"Horiek oro horrela izanik, edo ez izanik, erabakia dut aurrerantzean ez dudala onartuko euskaran maizegi aurkitzen dugun hutsune estrukturalik. Edo egitura zahar bat hartara egokituko dut, edo soluzio berri bat emango diot, baina ez naiz gehiago makurtuko itzulinguru, esaldi-mozte eta gisako inpotentzietara, "euskaraz horrelakorik ez dago" diotelako. Hutsune 'estrukturalak' esatean, egitura sintaktikoak esan nahi dut. Baita hutsune lexikoak ere. (Arlo honetan badakit premia askok, esapide, argot eta abar, ez dutela onartzen artifizialki hornituak izaterik). Eta, jakina, aditz demoniozko bezain problematiko horri buruz ere, erabaki ausarten batzuk hartu beharko dira, bere labirintoan itoko ez bagara. Lehiaren lege gupidagabez baino ez bada ere, bada inguruko hizkuntzekin nahitaez konpartitu behar dugula uste dudan ondare komun oso zabal bat, orain arteko gramatikak eta hiztegiak onartzen ausartu diren baino askoz zabalagoa, eta erabaki dut ez egotea hizkuntzalari, hiztegilari, gramatikari eta arauemaileen zain. Badakit bat baino gehiago (asko) aurkitzen direla nire antzeko sentieran, eta baliteke horiei ondo etortzea lan honetan planteatzen diren arazoak eta eskaintzen diren soluzioak".

ISBN: 978-84-937340-5-3
9 788493 734053

Lanku
tel. 943 260 755
www.lanku.com

Xabier Amuriza EUSKARA BATUAREN BIGARREN JAIOTZA Osoa, lehiakorra, nazionala Lanku

Osoa, lehiakorra, nazionala

# EUSKARA BATUAREN BIGARREN JAIOTZA



Xabier Amuriza

Lanku

Liburu honek Eusko Jaurlaritzako Kultura Sailaren laguntza jaso du.



I.S.B.N.: 978-84-937340-5-3
L.G.: SS-618-2010

Argitaratzailea:

Lanku Bertso Zerbitzuak S.L.
Astigarraga bidea 2, 2. Enpresa zentroa
20180 Oiartzun

e-maila: lanku@lanku.com
http://www.lanku.com



*OSOA, LEHIAKORRA, NAZIONALA*

# EUSKARA BATUAREN BIGARREN JAIOTZA

Xabier Amuriza

Lanku

*Euskara eguneroko lantresna dutenen artean,*
*diskurtso handiak baino soluzio txiki bat nahiago duten guztiei*

Biziki eskertzen ditut:

*Antton Erkizia, lan hau ikuskatzeko eta ohar interesgarriak eskaintzeko ardura hartu duena.*

*Karlos Cid Abasolo, Madrilgo Complutenseko irakaslea, zuzentzaile eta aholkulari oparoa izan dudana.*

# SARRERA OROKORRA

Ez nator hizkuntzalari, ez hizkuntzen irakasle. Ez nator teorizatzaile euskararen jatorriaren, etorkizunaren, transmisioaren, ez bestelakoen. Ezertan aditu espezifiko ez izateak hartara behartu nauen ikuspegi globaletik, nago euskararen arazo nagusia euskara bera dela. Hots, euskara deritzon tresna. Euskara irakatsi, transmititu, sozializatu... Zer ez? Eta irakasten, transmititzen, sozializatzen ari garen euskara... inbiablea balitz? Hizkuntza pentsaera ei da. Pentsamena, funtsean. Hori egia bada, ez dago dudarik nire pentsamena euskarazkoa dela. Baina nire pentsamena euskaraz adieraz dezakedana baino askoz gehiago bada, zer egin behar dut? Pentsamena ukatu ala adierazleaz arnegatu? Ez dut, ba, neure nitasunaren berdin den pentsamena ukatuko; ezta euskaraz adierazi ahal dudanera murriztuko ere. Beraz, adierazleaz arnegatu behar ez bada (hori ez dut nahi), euskara pentsamenaren hedadura guztira helarazi beharko dut. Pentsatzeko gai naizena naiz. Eta nire pentsamena adierazteko gai naizena da. "Ezin da hitzez adierazi" esan ohi da. Enfasi eran onar liteke, zeren, pentsamen mailan, adierazi ezin dena existituko ez balitz bezala baita. Eta existituko ez balitz bezalakoa ez da existitzen.

Ez naiz idazle soil bat baino gehiago, baina ezta hizkuntzaren eta bere espresioaren eragilerik direktoenak direnen kolektiboko nornahi baino gutxiago ere; bizi guztia daramana, beste askok bezala, euskara delako tresnaren langile. Langintza horrek tresnaz berataz arduratzea, ia obsesionatzea ekarri dit, beti beragaz teman, atsegin-erneguzko harremanean. Teman esan dut, bigunki, borrokan esan beharko nukeena. Borrokan gabeziekin, ezinekin, inprezisioekin, sarritan desesperazioekin. Askotan entzuna dut: "Baina ba al dakizu zenbat aurreratu den?". Kontua da aurreratu denak ez nauela kezkatzen, pozten baizik. Nire arazoa aurreratzeko dagoena da. Gabeziak agertzen zaizkit kezkagarri, oraindik gehiegi eta iraunkorregi. Zeren, aurrerakuntzak zuzen neurtzeko, abiapuntua eta helburua argi zehaztu behar dira, helburua batez ere.

Maiz dantzut (neu ere mintzo ohi naiz) euskarak halako eta bestelako estrategiak behar dituela. Beti ari gara zerbait efektiboagoa asmatzen: gazte-hizkeraren funtzionaltasuna, zaharren amnesia, hiztunekiko konprentsioa, idazleen askatasuna, euskalkien hurbiltasuna, batuaren zurruntasuna, hitz egitearen nagusitasuna, komunikazioaren lehentasuna... Arrazoi guztiek indar berdinez deitzen naute onartzera zein ukatzera. Nire jarrera teorikoa sinpleagoa da. Aurreratze-atzeratzeen eremua, berriz, erlatiboki laburra: euskara batuaren erabakitik honanzkoa. Artean, mende luzeetan, euskara, kulturalki, hizkuntza marginala izan zen. Nolabait esan, merkatutik kanpora iraun zuen. Erdarekiko konparazioak soraio uzten nau. Gaztelania eta frantsesa (eta beste erromantzeak) ez dira ez dakit noiz abiatuak, latinaren transformazioak baizik. Latinaren potentzia guztia heredatu zuten. Eta euren eremuetan, kultur hizkuntza inperante bezala ezarri ziren. Arteak, zientziak, teknologiak, zuzenbideak, filosofiak, teologiak... ez ziren euskaraz azaldu; are gutxiago sortu. Gehienez ere, itzultzen saiatu. Euskara erligiosoa zerbait pareratu zela egia da, baina, gero, euskaraz idazten zuten elizgizonen ere kultur hizkuntza erdara zen.

Euskara batutik honantz jo behar da (edo neuk, behintzat, hortxe jartzen dut muga) euskara kultur hizkuntza oso bihurtzeko ahalegina. Merkatu handian sartzeko erabakia. Lortuko ote dugu galzori-hizkuntzen zerrendan sartzen dutena kultur hizkuntza oso bihurtzea? Litekeena ote da lorpen hori, hizkuntza inperantea izan gabe?





Helburua hori bada (eta horixe nahi dugula dirudi), araberako erabakiak beharko dira. Bazterrean, bada iraupen-dema bat handien aurrean. Hizkuntza baztertuak ez dira elkarren aurka lehiatzen. Merkatuaren erdian, ostera, izaera- edo kualitate-dema ere jokatzen da; erdikoekin edo kultur hizkuntza indartsuekin nahitaez lehiatu behar da. Nire ustea da, kultur hizkuntzaren helburutik oso urrun egoteaz gainera, irizpide okerren gainean gabiltzala oraindik. Aldarrikatzera ausartzen naiz ezen, saiakera honetako hiru atal funtsezkoak jorik (beste batzuk ere badira, noski), kultur hizkuntza oso horren helburua lortzea ezinezko dela: 1) Oraingo sintaxiagaz. 2) Oraingo aditzagaz. 3) Oraingo hiztegien lexikoagaz.

Nire aholkulariak diost: "*Gaur egungo hizkuntzalaritza aurrerakoiak hizkuntza guztien arteko berdintasun ontologikoa defenditzen du*". Horretan, egia da (eta eskertzen diot) formulazioak zehazten lagundu didana. Funtsean, ostera, irizpideak ez zaizkit aldatzen. Berdintasun ontologikodun hizkuntzetan, gehienak galdu egin dira edo egingo dira, eta gutxienek lortu dute (edo lortuko dute) biziraupen sendo eta oso bat. Auzia faktore ez-ontologikoen gorabeheran dago, beraz. Mende batzuetan, behintzat. Mila batzuk urte barru, nork jakin mundurik existituko den ere. Saiakera hau aipatu hiru atal horiei soluzio eta irizpide batzuk proposatzera dator.

Izenburuak dioenez, hizkuntza 'osoa' nahi dut. Osotasuna erlatiboa da, noski, hizkuntzak beti ari baitira, batetik, osotzen, bestetik, zerbait galtzen. Ereferentzia bat inguruko hizkuntza garatuak izan daitezke, zeintzuek esan dezakegun gorputz osatu bat daukatela, nondik beharrezko eboluzioak karraskada handi gabe gerta daitezkeen.

Hizkuntza 'lehiakorra' ere nahi dut, hizkuntza sendoen artean bizi baikara. Ez dakit nongo tribu bat gehiago bagina, beharbada garapenaren erreferentzia bat izan gintezkeen, baina gauden eremuan gaude. Ingurua bolidoetan dabilenean, ezin gara bizikletan lehiatu. Horrek ez du esan nahi bizikleta ukatu behar denik. Bolidoa dutenek badute bizikleta, komeni zaienerako. Arazoa da, bolidoa behar denean, bizikleta bakarrik edukitzea.

Lehia ez da, ordea, kanpo-erlazio bat bakarrik. Geure baitan, geure adimenean, geure kontzientzian bertan daramagu gatazka. Euskaldun

alfabetatu guztiek dakite, gutxienez, beste hizkuntza bat. Orain askok, gehiago ere bai. Nire kasuan, bitasuna euskara-gaztelania da, Hego Euskal Herriko gehienena bezala. Kontua ez da nire euskarak besteen erdaragaz lehiatu behar duela bakarrik. Neu naiz, aldi berean, euskaradun eta erdaradun. Neu naiz, hizkuntz jardueran, bi zango horien gainean nabilena. Gorputzik gehienetan, zango bata bestea baino trebeago izaten da. Hizkuntzetan ere, bi edo gehiago dakizkitenei entzuna diet ezin dela ekidin hizkuntza bat besteen gainetik menperatzea, geruza ezberdinetan bada ere. Euskaldun askori gertatzen zaie, neu barne, hizkera kolokialean, euskaraz naturalago moldatzea erdaraz baino. Beste maila batzuetan, ostera, erdaraz osatuago daude.

Dena delakoa dela, abiapuntura itzulirik, kontua da bi zangoren gainean nabilela. Zango bata, neurri batean, bestea baino trebeago izatea osasunez jasan daiteke. Arazoa da batetik besterako aldea handiegia izatea. Nola antola dezaket desoreka hori, herren handia eginez ez bada? Desoreka bera ere naturala izan daiteke, zango sendoa norbere lehen hizkuntza denean. Bigarren hizkuntza bat erdizka menperatu arren, ez zaizu barne gatazka larririk sortuko. Horixe gehiago dakizu. Arazoa da zango mendrea norbere ama-hizkuntza denean, edo norberak hizkuntza hori lehen hizkuntza bezala bizi nahi duenean. Edo biak berdintsu bizi nahi dituenean. Orduan, bi zangoak gaitasun berdintsuko ez badira, herrentasuna izaerazkoa da. Batez ere, ohartu bazara herrentasuna daragien diferentzia ez dela zure akatsa, hizkuntza horrek oraindik betetzeke daukan hutsune bat baizik. Lehia nagusia ez da, beraz, hizkuntzatik hizkuntzarakoa. Edo hizkuntza baten jabe den multzo baten eta beste hizkuntza baten jabe den beste multzo baten artekoa. Norbere pentsamen, sentimen, adimen, hitz batez, norbere pertsona da, bi tresna ezberdinen arteko tentsioa jasan behar duena. Barne diglosia bat, nolabait. Tentsio horren agerpen nabaria da, arestian aipatu bezala, norbere lehen-hizkuntza gurakoan adierazi ezin delako, pentsamen-eremu batek erdara behar izatea. Herrentasuna nabarmentzen da zango batak eraman ezin duen pisua besteari kargatzen zaionean, gorputzak (pentsaerak), nola edo hala, osoan joan behar baitu.

Izenburuaren hirugarren osagaia, 'nazionala', ez dut uste azaldu beharrik dagoenik. Munduko euskaldun guztiek (beraz, 'mundiala' ere bai) elkar erraz eta osoki ulertzeko moduko tresna behar dugu. Baita behar





dugu tresna horrek ez dezala desabantaila handiegirik izan, bakoitzak bere baitan daraman beste hizkuntza bat edo batzuekiko; ez dadila hizkuntza marginala izan.

Horiek oro horrela izanik, edo ez izanik, erabakia dut aurrerantzean ez dudala onartuko euskaran maizegi aurkitzen dugun hutsune estrukturalik. Edo egitura zahar bat hartara egokituko dut, edo soluzio berri bat emango diot, baina ez naiz gehiago makurtuko itzulinguru, esaldi-mozte eta gisako inpotentzietara, "euskaraz horrelakorik ez dago" diotelako. Hutsune 'estrukturalak' esatean, egitura sintaktikoak esan nahi dut. Baita hutsune lexikoak ere. (Arlo honetan badakit premia askok, esapide, argot eta abar, ez dutela onartzen artifizialki hornituak izaterik). Eta, jakina, aditz demoniozko bezain problematiko horri buruz ere, erabaki ausarten batzuk hartu beharko dira, bere labirintoan itoko ez bagara. Lehiaren lege gupidagabez baino ez bada ere, bada inguruko hizkuntzekin nahitaez konpartitu behar dugula uste dudan ondare komun oso zabal bat, orain arteko gramatikak eta hiztegiak onartzen ausartu diren baino askoz zabalagoa, eta erabaki dut ez egotea hizkuntzalari, hiztegilari, gramatikari eta arauemaileen zain. Badakit bat baino gehiago (asko) aurkitzen direla nire antzeko sentieran, eta baliteke horiei ondo etortzea lan honetan planteatzen diren arazoak eta eskaintzen diren soluzioak.

Planteatzen diren arazo guztientzat ez da, noski, soluziorik lortzen. Garbi daukat, hala ere, arazoak planteatzea ez dela aurrerapen efektiboa. Soluzio txiki batek gehiago balio du hamaika planteamendu distiratsuk baino. Bai, bai! Arazoak planteatu gabe, ez dago soluzioak non aplikatu jakiterik. Gertatzen dena da euskal kultura, oro har, eta euskara, bereziki, arazoen aurkezpen errepikatuan oinarritzen dela sarritan; edo, baikortasunak ez pitzatzeko, arazoen saiheste eruditoan. Zaila da esplikatzen, "hainbeste egin duten hainbeste izanik" (zenbat "bizitza oso" ez dira eman euskararen alde, sarritan, aitortuak izateko, hil beharra izan badute ere!), nola honen setati dirauten hain gabezia handiek. Formulazioak aldatzen dira, aurrerapena itxuratzeraino, teoriak berritzen dira, ekarpen emateraino, baina, urteak joan, hamarkadak etorri, funtsak ia literalki berdin darrai. Saiakera honetan planteatzen diren eta, ustez, konpontzen diren arazoak hortxe dabiltza bueltaka, euskararen kontzientzia oso samarra izan nuenetik. Hemen aipatzen direnez gain, beste batzuk ere izango dira, nola

ez, mordo bat baino gehiago. Neurekiko, agertzen direnean, badakit jokaera: aurre egin, ez albo. Soluzionatu, alegia. Ezinezkotzat edo detektatu gabe gelditu direnen kasuan ere, uste dut badakidala konponbidea: aditu batzuk + metodoa + erabakia. Erabaki teknikoa eta, batez ere, erabaki mentala. Axular zaharra parafraseatuz, "orain egin dezakeguna ez utzi geroko".

Badakit euskarak abantailak ere badituena, batzuk handiak, baina ezingo naiz bikaintasunak 'konpontzen' hasi. Horientzat bada apologista ugari, ez dakit ohartuki ala oharkabean, sarritan, 'geurea' goraipatzen baitugu, meritua zertan datzan zehazki jakin gabe. Laketurik euskararen bakantasunaz, bakartasunaz (egiazkoak eurok, bestalde), ez gara hainbeste arduratu gabeziak hornitzen, zeintzuen agerpenak, azpi-azpian, gure laketasuna zapuz dezan beldur garen. Saiakera honek, euskararen gaitasunak mindu gabe, ezgaitasunak konpondu nahi ditu.





# SARRERA PARTIKULARRA

Saiakera hau *Elhuyar Hiztegia, Euskara-Gaztelania / Castellano-Vasco* eta *Diccionario 3000 Hiztegia, Euskara-Castellano / Gaztelania-Euskara* izeneko hiztegiak argitaratu aurretik egina neukan. Duela hogei bat urte. Pentsa noiztik dagoen linboan! Hiztegi horiek egiten ari zirenik ere ez nekien. Eurok argitaratu eta gerora, lanari berrikusi bat eman nion, baina hiztegi berriak astiz eta xeheki ikusteko modurik izan gabe, hori, batez ere, erabileran egiten baita. Bota nien gainbegiratutik, eta nire saiakerak heltzen zien zenbait puntu garrantzitsuri zegokienez, ohar orokor batzuk egiten arriskatu nintzen.

Berrikuste hartatik ere, urte mordoa joan da. Orain, jakina, hiztegi horiek gehiago ikusia eta erabilia naiz, baina, sarrera hauxe salbu, ez noa lanari esku berri sakonik ematera, azken errepasoak dakartzan orrazketa txikiak eta errazak besterik, beldur bainaiz ez ote nauen, intentu luzatuetan, heriotzak kakaginan harrapatuko. Hala ere, susmoa daukat, ia segurtasuna ere bai, hiztegi horien azterketa zehatzago batek ez dituzkeela ondorioak asko aldatuko.

Euskarak, osasunez iraungo badu, gorputz osoa, leihakorra eta nazionala behar du. Euskara batuari, aurrerakuntza handiak eta pozgarriak egin dituenari, oraindik asko falta zaio osatzeko. Eremu akademikoa duintasunez salba dezake, eta salbatzen duela baiezta genezake. Baina hizkuntzaren maila guztietan (ikaskuntzan, irakaskuntzan, literaturan, komunikabideetan eta, batez ere, hizkuntza mintzatuan) osotasun leihakor eta nazional bat lortzen ez badu, galtzen dena irabazten dena baino gehiago izateko arriskuan gaude. Euskara batuak edo euskararen praktika nazional batuak ez du, nahitaez, uniformetasuna esan nahi, baina bai nahitaezko koherentzia bat. Irizpide eta praktika amankomunez osaturiko eredu nazional bat. Horretarako, plangintza nazional osoa behar da, baita araberako antolakuntza ere, gai izango dena kontrol positiboa markatzeko, soluzioak aportatuz, eta kontrol negatiboa, okerrak zuzenduz.

Hori guztia nabarmenki falta dugu oraindik, eta nahiz eta, teorian, euskara batua eta osoa aldarrikatu, beldur naiz inpotentziazko sentipen aitorgabe bat zabaldu ez ote den. Euskararen praktika nazional koherentea eta kontzientea kimera bat dela irentsita ez ote gauden nago. Ez du balio talde-lana izateak, talde nazionala ez bada. Baikortasun militanteak ere ez du balio, euskara batuak prestigio eta efikazia nazional osoa lortzen ez badu. Saiakera honetan hori guztia planteatzen da, edo planteatu nahi da. Horretarako, lehen premia nagusietako bat bezala jotzen da hiztegi nazional osoa eta bakarra, eta horri dagokio lanaren zati handi bat. Beste arazo garrantzitsu batzuk ere jorratzen dira (euskararen hutsuneak, erlatiboa, aditza, sortzaindia, zuzentzaindia...), plangintza eta praktika nazional horretarantz tiratu nahian.

Lanaren asmo nagusia eztabaida bat irekitzea da, noski, baina baita soluzioak proposatzea ere. Garbi esanda, soluzioak aurkeztea, zeren erabakia baitut hemen arrazoitzen diren zenbait proposamen jada praktikatzea. *Joan ziren* zikloko lehen hiru liburukietan (*Dinosauroak horizontean, Orain ezin naiz hil* eta *Olatu bat kuartelen gainetik*), eta etorriko diren gainerakoetan, lan honetan zehar azaltzen diren irizpideen arabera idazten dut, denbora luzeegia beharko duten beldur naizen aurrerakuntzen zain egon gabe.





Itxaroten dut proposamen hauek, zenbait kasutan behintzat, beste batzuentzat ere balioko dutela, eta horrexek animatu nau hainbeste urte gordean zeraman lana argitaratzera. Bertan, arazoak zuzen eta eufemismo gabe biltzera deitzen da. Ahalik eta inbentario zabalena eta errealena egin, gero soluzioak osoan bilatzeko. Badakit hemen arituez beste auzi asko ere badaudena, baina aipatzen direnetan, hutsuneak planteatuz gainera, iritziak eta soluzioak ematen ere saiatzen naiz. Horiekin bat etortzea ez da derrigorra, errefutatzea zilegi da, baina badirela ukatzea zail izango da.

Azkenik, azaltzeko era ez da, beharbada, lar akademikoa izango. Gramatikan eta abarrean, noizbait banekien apurretik, terminologia-kontuak nahiko ahazturik dauzkat. Gauzak ahal dudan moduan azaltzen ditut, eta hori baliteke hain eruditoak ez direnek gehiago eskertzea, teknizismoetan zorabiatu gabe. Ulertzeko moduan mintzo naizela uste dut, eta horixe da behinena.

# BI HIZTEGI BERRI

Entzuna dut hizkuntza baten eta kultura baten maila bere hiztegietan islatzen dela, eta egia handia delakoan nago. Beharbada, euskararen ahultasunari *Hiztegi nazional osoa eta bakarra* eskatzea askotxo izango da. Beharbada, euskaldunon kultura pintoreskoegia da oraindik, xede ustez normal horri heltzeko. Baina, oraingoan, errua ez dauka Madrilek edo Parisek, edo erdaren presioak, edo direnak direlako kanpo faktoreek. Errudun nagusia euskaldunon gaitasun maila da.

1) Lehen-lehenik (eta horretarako ez dago hiztegiak arakatu beharrik), saiakera honek markatu nahi lukeen espirituaz oso bestera dator hilabeteren barruan bi hiztegi ezberdin plazaratu izana. Bataren eta bestearen aurkezpen eta ondorengo adierazpenetan esan zen ezen lehia hori, ekonomikoki, elkarrentzat kaltegarri izan zitekeela, baina euskararentzat ongarri. Auzi ekonomikoa, bai egileena eta bai erosleena, gutxietsi gabe, bigarren auziari behinago deritzot, eta horretan ez nago ziur euskararentzat hain ongarri nondik izan daitekeen.

Adierazpen horietan esan zen *Euskara-Frantsesa / Frantsesa-Euskara* ere beharrezko zela, baina hori Iparraldekoek egin beharko luketela. Desio hori betez gero, hiru hiztegi genituzke, bat-batean. Hori ere euskararentzat ongarri litzateke agian, baina bai egoera errukarria, hain eremu txikian. Badirudi pixka baterako egoera izango dugula bera.

Tarteka entzun izan ditut erdarekiko konparazioak, gaztelaniaz ez dakit zer, frantsesez ez dakit zar, eta ingelesez ez dakit zor, beti ere dispertsioa justifikatzeko adibideekin, baina dispertsioa hizkuntzaren erdigunean (osagai zentraletan) ala periferian izan, alde handia dago. Amerikako mapa orokorrean, Uruguay, adibidez, zokondo koskor bat legez ageri zaigu. Ostera, bere inguruaren proportzioan denik txikiena izanik ere, Euskal Herri osoa baino ia bederatzi bider handiagoa da. Eta denak dira elebakarrak. Hemen, lurralde fisikoaren txikitasunari euskaldunen proportzio murritza eta diluitua gaineratzen bazaio, benetan eremu minuskuloan geratzen gara.

2) Aipatu bi hiztegiak nahiko ezberdinak iruditu zaizkit ematen dituzten soluzioetan. Ez-kointzidentzia gehiegi sumatzen dut, hain denbora eta ia eremu berean eginak izateko. Irizpideetan alde handiak edo zalantza handiegiak egon direla esan nahi du horrek. Adibidez:

*Previsible*:
- Aurreikus daitekeen, aurreikusteko moduko... (*Elhuyar*).
- Aurrikusgarri, aurrez ikusteko. (*H. 3000*).

*Previsor:*
- Zuhur, ernai. (*Elhuyar*).
- 1. Aurreikusle, aitzinikusle. 2. Begiratu, zuhur. (*H. 3000*).

*Imprevisible:*
- Aurretik jakin/esan/ikusi... ezin dena. (*Elhuyar*).
- Ohartezin, somaezin. (*H. 3000*).

*Improbable:*
- Nekez gertatzeko; nekez sinesteko; uste ez izateko.(*Elhuyar*).
- Gertagaitz. (*H. 3000*)





*Inculpar:*
- Erruztatu, -ri errua egotzi. (*Elhuyar*).
- Errua/hobena bota, errua egotzi, erruduntzat jo, ezarri, leporatu, egotzi, -ren bizkar eman, hoben eman. (*H. 3000*).

Pazientzia apur bategaz, honelako adibideak ehundaka, agian milaka, aurki daitezkeen susmoa daukat. Gaztelaniaren menpeko esparruan buruturiko bi hiztegik diferentzia horiek ematen badituzte, frantsesaren esparruan egitea desiatzen den hirugarrenak pentsa zer ekar lezakeen.

3) Hiztegi bata nahiz bestea bat datoz sarrera edo hitz bakoitzari sinonimo edo antzeko mordoa aplikatzeko joeran. Adibidez:

*Prudente:*
- Zuhur, burutsu, zentzudun, zogi. (*Elhuyar*).
- Zuhur, zogi, arduratsu, artatsu, axolati, begiratu. (*H. 3000*).

*Prudencia:*
- Zuhurtzia, zuhurtasun, tentu, kontu. (*Elhuyar*).
- Zuhurtasun, zuhurtzia, tentu, zogiera. (*H. 3000*).

*Imprudente:*
- Zuhurtzigabe, ausartegi; ero, zoro. (*Elhuyar*).
- Zuhurgabe, zuhur ez, zentzungabe, burugabe, tentel. (*H. 3000*).

*Imprudencia:*
- 1. Zuhurgabetasun, zuhurtzigabekeria, zuhurtzia ez.
- 2. Arinkeria, tentelkeria, kaskarinkeria. (*H. 3000*).
- Zuhurtziarik eza, zuhurtzigabetasun, zuhurtzigabekeria, arduragabekeria. (*Elhuyar*).

Jokabide honek anbiguetate eta inprezisio handian uzten gaitu, batez ere, hiztegi batetik bestera alde handi samarrak ageri direnean. Hitz edo ordain berak, gero, beste hainbat sarreratan berdintsu agertuko dira. Badakit mugak ez direla inola ere zehatzak, baina *prudente/prudencia*-tik eta hauen antonimoetatik oso urrun dauden hitzak edo hitz-erroak datoz hemen: *zentzu, tentu, buru, ardura, arta, axola, ausart, ero, zoro, tentel...*

4) Erdal hitz baten euskal ordaintzat, sarritan, hitz bat barik, definizio bat emateko euskal hiztegien lehengo joerak hiztegi hauetan ere jarraitzen duela dirudi. Esaterako:

*Imprevisible:*
- Aurretik jakin/esan/ikusi... ezin dena. (*Elhuyar*).

*Improbable:*
- Nekez gertatzeko; nekez sinesteko; uste ez izateko.(*Elhuyar*).

Itzulpen horiek hitzaren ordaina baino gehiago, esanahiaren definizioak dira, beste hiztegi mota bati dagozkionak. Demagun *imprevisible*-ren ordaintzat *aurreikusgaitz* hartzen dugula. Orduan, euskal hiztegi batean, honela letorke hitz horren azalpena edo definizioa:

*Aurreikusgaitz.* 1. *Izond.* Aurretik jakin, esan, ikusi... ezin dena.

5) Azkenik, saiakera honetan planteatzen den auzirik beharbada garrantzitsuenean, (mailegu posibleei buruzko irizpidean, hots, europar hizkuntza askoren 'ondare komunean' euskara ere kide izatean), bi hiztegi berriok oso urrun ikusten ditut. Bai batak eta bai besteak saihesbidea hartzen dute, euskarak, neure ustez, duda gabe bereganatu behar lituzkeen hitz komun eta garrantzitsu ugarietan. Horretaz gero egingo dugu beste aipamen bat, gaia astiz eta luze tratatzen den atalean.





# EUSKARAREN HUTSUNEAK

Bi hiztegi berriek eragin didaten sarrera presatsu samarra horretan utzirik, abia gaitezen, orain, hasieratik pentsatutako lanean. Saiakera honetan, euskararen hainbat auzi larri azaltzera nator, batzuk ustez konponduz, beste batzuk soilki planteatuz, eta, beti ere, irizpide konpongarriak proposatzen ahaleginduz. Horretarako, gabeziak nabarmentzen dira. Nire asmoa ez da euskarak eman dituen aurrerapauso handiak aldarrikatzea, ez gutxiestea. Horren kontzientzia badut, eta ez dut ukatuko. Beldur naiz, ordea, eginkizun horretarako, badela aski pregoilari, aurrerakuntzak goraipatuz, ez gutxitan, puztuz, gabeziak saihesten edo haietaz ohartzen ez direnak. Aurreratu denaz pozturik, hizkuntza potente bat izateko falta zaigunaz jabetzea eta osatzea interesatzen zait. Eta askoz aurrerago eraman gaitzakeen ahalegin antolatuago baten premia aldarrikatzea.

## Erlatiboa

Hizkuntzaren (gure inguruko hizkuntza guztien) egitura nagusietako bat erlatiboa da. Sorkuntza literarioan, berriz, funtsezkoena dela esaten ausartuko nintzateke. Xehetasun guztiekin heltzekotan, berak bakarrik osa lezake liburu gizen bat. Euskaraz oraindik erlatiboaren zati handi bat airean daukagu, itzulinguru arbitrarioz eta, sarritan, okertzailez, baliatzen garela.

Erlatiboa egitura funtzional bat da. Ez da dotore edo literarioki erabiltzekoa, zuzen edo oker baizik. Horretarako, zehatza, finkoa eta erraza izan behar du. Dela partikula bat, dela atzizki bat, dela nahi dena, mekanikoki aplikatzeko egitura izan behar du.

Bi erlatibo mota nagusi daude: murrizgarria eta ez-murrizgarria. *Zentzuna daukan pertsonak zertan sartzen den aurretik pentsatu behar du.* Hemen 'daukan' hori erlatibo murrizgarria da, pertsona definitzen duena. Ez dago tartean komarik, ez inolako etenik sartzerik, erlatiboak bere jabeari atxikia joan behar baitu.

*Pertsonak, zentzuna daukanak, zertan sartzen den aurretik pentsatu behar du.* Hemen, 'daukanak' hori erlatibo ez-murrizgarria da; bide batez, pertsonaren argibide bat ematen duena, baina une horretan nahitaezkotzat jotzen ez dena. Erlatibo hau, idazkeran, komaz edo beste ikur batez adierazi ohi da.

Euskaraz, erlatibo ez-murrizgarria, oro har, eta teorian behintzat, konponduta dagoela esan daiteke, nahiz eta erabileran eskrupulu asko dabilen oraindik. Iheska ibili ohi gara, zenbait aurreiritzi gainditu ezinik.

## Erlatibo ez-murrizgarria

1) Erlatiboa bere jabearen kasu berean doanean, ez dago problemarik.

- *Animaliak, ondo janda dagoenak, ez zaitu erasoko.*
- *Animaliei, ondo janda daudenei, lasai hurbil zakizkieke.*





- *Hor daude gizonak, tente egoteko kemena doi-doi daukatenak.*
- *Unibertsoaren, etengabe mugitzen ari den sistema horren, printzipio nagusia da...*
- *Itsasoarekin, noiz haserretuko den abisatzen ez duenarekin, hobe duzu gehiegi ez maitemintzea.*

Bada, ordea, koska bat, erlatiboa eta erlatiboduna NON kasuan doazenean. Hona erdal adibide bat: *En esta casa, en la que ahora vivimos solamente dos personas, nacieron y crecieron doce hijos.* Euskarara honela itzultzeko tentazioa izan daiteke: *Etxe honetan, orain bi lagun bakarrik bizi garenean, hamabi seme-alaba jaio eta hazi ziren.*

Euskaraz, *'garenean'* horren lehen esanahia, indartsuen atzematen duguna, denborazkoa da. *'Cuando vivimos'* eta ez *'en la que vivimos'*. Ekiboko hori kontestuak argitzeko utziko al dugu? Ez. Badaude beste forma batzuk: *Etxe honetan, orain bi lagun bakarrik bizi garen honetan, hamabi seme-alaba jaio eta hazi ziren.* Edo: *Etxe honetan, non orain bi lagun bakarrik bizi garen, hamabi seme-alaba jaio eta hazi ziren.*

2) Gehienean, erlatiboa eta erlatibodun hitza ez datoz bat kasuan. Hona adibideak gaztelaniaz:

- *El presidente, cuyos planes no parecieron agradar a la cámara, volvió a insistir en que...*
- *Y ahora la empresa a la que dediqué casi toda mi vida me propone este retiro miserable.*
- *Tal era mi padre, de quien todos hablan bien menos mi madre.*
- *Una persona amargada y arisca, con la que apenas puedes pasar de los buenos días.*

Eta hala kasu guztiak: *nor, noren, nori, norekin, norentzat, norengana, nortaz, norengandik, norekiko...* Berdin *zer, zeren, zeri, zertaz, zerekin, zerentzat, zergatik, zertarako, zertatik...*

Datiboa, kasu hori aditzak bere flexio bategaz adierazten duelako, N atzizkiaz erabaki daiteke: *Eta orain enpresak, ia neure bizitza osoa dedikatu diodanak, erretiro miserable hau proposatzen dit.* Beste kasuak *zein* formaz

adieraz daitezke:

- *Presidenteak, zeinaren planak ez bide ziren kameraren gogoko, berriz ekin zion...*
- *Halakoxea zen gure aita, zeinaz (zeinagatik) denak ondo mintzo diren, gure ama izan ezik.*
- *Pertsona mingotsa eta izua, zeinarekin nekez jo daitekeen 'egun on'-etik harago.*

Beste batzuk:

- *Lehenengo emaztea, zeinarekin bi ume izan zituen, era guztiz ilunean hil zen. Bigarrena ere, zeinaren argazkia aurrean daukazuen, antzera hil zen. Hirugarrenak, berriz, zeinarentzat aurrekoen esperientzia ez bide zen hutsa izan, berak hil zuen senarra, honek ezer planifikatzeko astirik ukan aurretik.*
- *London guztian lagun bakarra ezagutzen nuen, zeinaren bidez beste batzuen ezagutza lortu nuen.*
- *Bazihoan Txanogorritxo, eta otsoa agertu zitzaion, zeinak galdetu zion...*
- *Eta otsoa, zeinarengan Txanogorritxok ez duen asmo txarrik sumatu, lasterka abiatzen da amamaren etxerantz...*

ZEIN bezala, NOR eta ZER har zitezkeen edo har daitezke. Tradizioa eta erabilera ZEINen alde gehiago erori da, eta horretan jarraitzeari ondo deritzot. Dena dela, ez nuke txartzat joko honelakorik:

- *London guztian lagun bakarra ezagutzen nuen, noren bidez beste batzuen ezagutza lortu nuen.*
- *Eta otsoa, norengan Txanogorritxok ez duen asmo txarrik sumatu...*

Orduan NOR erlatibo pertsonala litzateke eta ZEIN, ez-pertsonala. Eta ZER, neutroa, gaztelaniazko *lo que, con lo que, por lo que, para lo que,* eta abar.

Bereizpen hau aberasgarri litzateke, baina, lehenik, konpon dezagun aurrekoa.

ZEIN formara mugaturik, nola deklinatu bera? Izenordain galdekari





gisan mugagabea bada ere, izenordain erlatibo gisan, deklinabide mugatua dagokio, edozein izeni bezala. Mugagabezko deklinabidea ere bada, noski, tradizioan, baina ni neu, arrazoiren bat dagoen guztian, bereizketaren alde makurtzen naiz. Beraz, singularrean: *zeina, zeinak, zeinaren, zeinari, zeinarentzat, zeina(ren)gatik, zeina(ren)gana...* Pluralean: *zeinak, zeinek, zeinen, zeinei, zeinentzat, zeinengatik, zeinengana...*

Pluralean, hala ere, hobetzat joko nuke: *zeintzuk, zeintzuek, zeintzuen, zeintzuei, zeintzuentzat, zeintzuengatik, zeintzuengana...* Forma honek, euskararen eremu handi batean eginda dagoen bereizketa batez baliaturik, argitasunean irabazi egiten duela dirudi.

Beste kontu bat da izenordain erlatibo honek, gero, BAIT partikula eta honi dagokion aditz-jokoa behar duen: *Eta otsoa, zeinarengan Txanogorritxok ez baitu asmo txarrik sumatu...*

Forma biak aukeran utz daitezke, bakoitzaren gustuaren arabera. Nik, normalean, forma laburragoen alde, edo beharrezko ez diren elementuak ekiditera joko nuke. Izan gogoan figura literario bat barik, egitura funtzional bat finkatzen ari garela. Laburtasuna balio bat da, argitasuna eta zehaztasuna mintzen ez baditu.

N erlatiboa ondo datorren kasuetan -absolutuan eta datiboan- ZEIN forma erabil al liteke?

a) *Eta ondoren, presidentea, argazkian agurka ageri dena, bere yatera itzuli zen.* Edo: *Eta ondoren, presidentea, zeina argazkian agurka ari den, bere yatera itzuli zen.*

b) *Eta ondoren, presidentea, argazkian agurka dakusguna, bere yatera itzuli zen.* Edo: *Eta ondoren presidentea, zeina argazkian agurka dakusgun, bere yatera itzuli zen.*

c) *Eta ondoren, presidentea, argazkian aurpegia bakarrik ikusten zaiona, bere yatera itzuli zen.* Edo: *Eta ondoren, presidentea, zeinaren aurpegia bakarrik ikusten den argazkian, bere yatera itzuli zen.*

Lehen formak argiago eta laburrago badirudi ere, ez nuke bigarrena gaitzetsiko. Beste kasu guztietan ZEIN forma naturalki darabilenari, ez da harritzekoa kasu hauetara ere lerratzea. Gertatzen dena da forma hori natural erabiltzeko erreparo handiak daudela oraindik. Zenbat sigi-saga barregarri egin ohi dugun, Etxeparek duela bostehun urte argi zeukan egitura zehatz eta beharrezko bat saihestu nahian.

ZEIN erlatiboaren erabilera kezkagabea garbi utzitakoan, badago konkordantzia-arazo bat. Sarritan, euskarak esaldia ordenatzeko duen era ezberdinagatik, erlatiboa bere sostengutik urrun gelditzen da. Adibidez, gaztelaniaz:

- *Y así siguó la fiesta, mientras el palacio veraniego del emperador, que había aguantado impasible a la jauría de fotógrafos, cerraba de una en una sus ventanales.*

Hemen QUE erlatiboa bere jabe duen EMPERADOR hitzaren ondoan dago. Orain, esan dezagun gauza bera euskaraz:

- *Eta halaxe jarraitu zuen jaiak, enperadorearen udako jauregiak, zeinak argazkilari saldoari sorgor eutsia zion, bere leihotzarrak banan-banan ixten zituela.*

Hemen *'enperadorearen'* eta ZEINAK erlatiboaren artean, beste bi hitz daude. Nori dagokio erlatiboa? Bistan da kontestuak erabaki behar duela. Ekibokoa eragiteko edo argitasuna galerazteko motiboak daudenean, esamoldea aldatu beharko da. Kasu honetan, esaterako:

- *Eta halaxe jarraitu zuen jaiak, argazkilari saldoari sorgor eutsia zion enperadorearen udako jauregiak bere leihotzarrak banan-banan ixten zituela.*

Erlatiboaren izaera aldatu egin dugu, ez-murrizgarri zena murrizgarri bihurturik, baina aldakuntza gramatikal horrek ez du esanahirik hainbeste okertzen, eta bai esaldia hobetzen. Konkordantzia problemak zenbait alditan handiak izan daitezke, eta bertan ikusi beharko da, baina, oro har, ez da problema handia, erlatiboaren egitura hori onartuz gero. Problema





da, agian teorikoki gaitzetsia ez izan arren, praktikan ez dagoela *afektiboki* onartua. Ihes egiten zaio, egitura sasikoa bailitzan, eta jarrera hori gainditu ezik, alferrik da ondorengo mailak -konkordantzia eta abar- planteatzea.

3) ZEIN egituraren paraleloa da NON erlatiboa ere, bere deklinabide guztian: *non, nongo, nora, nondik, norantz, noraino.* Hona gaztelaniazko adibideak:

- *Ahí tienen ustedes la temida isla, donde al amparo de una belleza sin límites, viven las serpientes más venenosas de la tierra.*
- *En este valle, de donde son las mencionadas tribus, se filmaron las películas más fantásticas del Oeste.*
- *Ahí tienen ustedes la vista de un campo de concentración, de donde solo una minoría tuvo la suerte de salir con vida.*

Euskaraz honela jar daitezke:

- *Hor daukazue uharte beldurgarria, non, edertasun mugagabearen babesean, lurreko sugerik pozoitsuenak bizi diren (bizi baitira).*
- *Haran honetantxe, nongoak diren (baitira) aipatu tribuak, filmatu izan dira Oeste filmik fantastikoenak.*
- *Horra hor kontzentrazio-zelai baten ikuspegia, nondik gutxien batzuek bakarrik izan zuten (baitzuten) bizirik irteteko zortea.*

Forma hauek ez lukete inolako muzinik behar. Agian, adibideok artifizial samar emango dute, kontestu bat gabe, baina erlatibo mota hori noiznahi aterako zaio narratzaileari zein itzultzaileari, bere kontesturik naturalenean.

## Erlatibo murrizgarria

Erlatibo ez-murrizgarriak, bere koska eta zalantza guztiekin, nahiko konpondua badirudi ere, erlatibo murrizgarriaz ez dago gauza bera esaterik, ezta gutxiagorik ere. Hemen, zuzen eta garbi, aditzak adierazten dituen subjektua, objektua eta datiboa bakarrik daude hornituak.

Subjektu transitiboa (agentea) eta intransitiboa: - *Ni maite nauen lagunak osorik maite beharko nau. Hainbeste gustatzen zaigun diruak zerbait ona ere izango du. Aterpean egiten den lanak gorputza gutxiago hondatzen du.*

Objektu zuzena: - *Egunero jaten dugun ogiak errespetua merezi du. Maiteen dudan urtaroa negua da. Esan duzun gezurra zeuk ere ez duzu sinesten.*

Zehar-objektua: - *Dena ematen zaion haurrak gehiago eskatzen du. Gaur omenaldia egiten diogun gizon honek... Ez dago aukera guztiak eskainiko dizkizun bizimodurik.*

Atzizki erlatibo horrek aditzak zuzen markatzen ez dituen beste kasu batzuk ere adieraz ditzake.

a) NON kasua, batez ere, biak, erlatiboa eta erlatiboduna, kasu horretan doazenean.

*- Zu jaio zinen egunean. Bizi garen mundu honetan. Irakasle onak dauden eskolan. Errespeturik ez dagoen etxean. Itsua alkate den herrian. Ikusi zintudan unean bertan maitemindu nintzen zutaz. Gabiltzan moduan. Bizi aztarnarik ez dagoen planetetan. Zigorra nagusi dabilen eskoletan. Zezenak adarra sartu zion lekuan, patroiak agintzen duen lekuan, hegazkina erori zen mendian...*

Horietan guztietan, erlatiboak NON adierazten du, gaztelaniazko *en que, en el que, en la que, donde...*

b) Erlatiboa eta erlatiboduna kasu ezberdinetan doazenean ere, berdintsu.

*- Zu jaio zinen egunetik aurrera, zu jaio zinen egunerako, zu jaio zinen eguna, zu jaio zinen eguneko... Bizi garen mundu honetatik, bizi garen mundu honetako... Errespeturik ez dagoen etxeko, errespeturik ez dagoen etxetik, errespeturik ez dagoen etxera... Zezenak adarra sartu zion lekutik odola borbor zerion...*





Eta horrela beste adibide guztiekin. Horietan, erlatiboak NON kasua adierazten darrai, baina erlatiboa menpean daraman hitza NON kasuaz beste batean doa: *egunetik, egunerako, eguna, eguneko...*

c) Aurreko adibiderik gehienak aditz intransitibodunak ziren. Jar ditzagun aditz transitibodun adibideak, hauekin, gramatika zorrotzean, aiseago gerta baitaiteke ekibokoa.

*- Horixe da nik lan egiten dudan enpresa. Bizi guztia lanean eman dudan enpresatik esku hutsik bidali naute. Animaliak jaten duen tokian bizi nahi du. Atzo afaldu genuen jatetxeari su eman omen diote. Txoriak gogotsuen kantatzen duen sasoia ilunabarra da.*

Adibide hauetan ere, erlatiboak NON adierazten du, ez ZER edo konplementua. Ez da animaliak *tokia jan duela, toki hartan jan duela* baizik. Nola biziko da, ba, berak, intsektua bailitzan, aurretik jandako tokian? Bai esan dezakegu: *animaliak jaten duen intsektuan pentsatzen du.* Hemen, jakina, intsektua bera jaten du, eta ez intsektuan jaten, tokia bailitzan. *Atzo afaldu genuen jatetxea* ere ez da geuk jan edo irentsi genuen jatetxea, txuleta bailitzan, bertan afaria jan genuena baizik. *Txoriak kantatzen duen sasoia* ez da sasoia bera kantatzea, *Agur, jaunak* bailitzan, sasoi hartan kantatzen duela baizik. Zerk bereizten du noiz den NON eta noiz den ZER? Izen ardatzaren esanahiak.

*- Huraxe da goazen herria. Huraxe da goazen gailurra.*

Hemen *joan* aditzak *nora* edo *norantz* adierazten du. Adibide soilotan ez dago kontesturik, baina pentsa dezagun. Monitore bat gaztetxo talde bategaz egunsentian mendiz abiatu da, eguerdian hain herritara heltzeko planez. Bidean zenbait herrixka edo auzo iragan dituzte. Ibiltariak nekatzen hasiak dira, gosetzen ere bai, eta hamabiak aldean, etxe multzo bati erreparatu dioteneko, norbaitek galdetzen du:

*- Hori al da goazen herria?*
*- Ez. Lasai. Esango dizuet, bistaratzen denean.*

Halako batean, mendilepo bat gaintzen dute eta, beste aldeko

aranean, nahi baino urrunago, herri bat ageri da. Monitoreak orduan, esku osoz eta hatz luzez, hots egiten du:

- *Huraxe da goazen herria.*

Erdaraz *el pueblo al que vamos, adonde vamos.* Demagun, antzeko kontestuan, mutiko batek galdetzen duela:

- *Aizu, maisu! Orain non goaz?*

Monitoreak mapa ateratzen du eta, puntu bat seinalatuz, erantzuten:

- *Hementxe. Hauxe da orain goazen mendia.*

Kasu honetan *non goazen* da. Nondik goazen galdetu balu, erantzunak ere nondik goazen adieraziko zukeen, erdaraz *el monte por el que, por donde vamos. Zein menditan gatoz*? galdetzen badu, mapan seinalatu eta erantzun daiteke: *Hauxe da orain gatozen mendia. Zein menditatik etorri gara?* galdetu duenari erantzun dakioke: *Hauxe da ordu eta erdian etorri garen mendia, eta beste hauxe, laster iritsiko garena.* Erdaraz: *Éste es el monte por donde hemos venido durante hora y media, y éste otro, (el monte) al que llegaremos enseguida.* Jar dezagun adibide gehiago:

- *Izenik ere ez genekien hainbat herri pasatu genuen.*
- *Izenik ere ez nekien batekin maitemindu nintzen.(Cuyo nombre)*
- *Egunero izaten dut tonto jartzen naizen uneren bat.(En el que).*
- *Zabiltzan lagunekin ibilita, ez zara asko hobetuko.(Con quienes)*
- *Zabiltzanekin ibilita, ez zara asko hobetuko.* (Con quienes andas)

Adibide guztiotan eta jar litezkeen beste milatan, kontestuak eta aditzen zentzuak erabakitzen dute. Eta erabilerak, noski. Oso urrun iritsi izan den erabilera berau. "Hori sinpleegia duk", esan lezake norbaitek. Ba, sinpletasun horrek gure erlatiboari oso hedapen handia eman dio, eta aurreraturik daukaguna atzeratzen ez gaitezen saia, azken boladan gailentzen ari den izurriari jarraituz. Honelako esamoldeak zabaltzen eta justifikatzen ari dira:





- *Ikasi nueneko eskola. Hori gertatu zeneko astea. Ito zeneko erreka. Gaur erregea jaio zeneko eguna ospatzen dute. Gogoratzen al zara elkar ezagutu genueneko egunaz*? Edo okerrago esanda: *Gogoratzen al duzu ezagutu gineneko eguna? Egunero kafea hartzen duguneko tabernan...*

Eta abar, eta abar.

Egitura hori aspaldian sortu den inbentziorik traketsenetakoa da. Ezer argitzen ez duen konplikazio bat. Aitzitik, ordea, argi zegoena ilundu eta beste eremu bat lorrindu. NEKO atzizki bikoitza finkatua eta zehatza da denborazko esanahian. Oso ondo leudeke, adibidez:

- *Noiz bilduko gara, egunero elkarrekin kafea hartzen genueneko historiak gogoratuz?*
- *Orain ez dago gu gazteak gineneko konturik.*
- *Umea nintzeneko gauzak gogo-gogoan dauzkat, eta bezperakoak, ostera, erabat ahaztuak.*
- *Seme-alabak etxetik joan zaizkigu, eta oraintxe gaude berriz ezkonberri gineneko bizimodu klasean.*

Adibide guztiotan ez da NON kasua, NOIZ baizik. Erdaraz: *Las historias de cuando tomábamos el café... De cuando éramos jóvenes... Las cosas de cuando era niño... El tipo de vida de cuando éramos recién casados...*

NEKO atzizkiak badauzka beste erabilera batzuk ere, baina erlatiboaren aipatu NON kasua egin zaion oparirik kaxkarrena izan da. Egin duen on bakarra da azpian datzan benetako problema bat salatu, oharkabean bada ere.

Hala ere, kontestuak eta erabilerak, N atzizki erlatiboaren hiru kasu ohizko eta direktoez gainera (absolutua, ergatiboa eta datiboa), beste kasu batzuk ere adieraz ditzakeela eta adierazten jarraitu behar duela defendatzeak ez du salbatzen gelditzen zaigun hutsune handia. Hain zuzen, hutsune horixe betetzea da atal honen xede nagusia, ondoren saiatuko naizenez.

## Soluzio gabeko kasuak

Gure erlatibo murrizgarriak, N atzizki misterioso horrek, aditzaren barnean doazen hiru kasuak bakarrik adierazten ditu zuzenki. Beste batzuk ere baietz esan dugu, kontestuaren, aditzen zentzuaren eta erabileraren euskarriz. Baina erlatiboa aditzetik aparteko egitura bat da, hizkuntzaren mekanismorik funtsezkoenetakoa, aditzari baino areago deklinabideari lotua. Hitz batez, deklinabide guztia hartzen duen kontzeptu bat. Euskaraz, aditzaren ahalmenera mugaturik egotea eta hortik at problemak agertzea, euskararen problema da, ez erlatiboaren izaera. Zergatik ez dugu problema hori behingoz konpontzen ahal?

Euskal deklinabidea honela doa: *Nor* (subjektu intransitiboa eta objektu zuzena), Nork (subjektu transitiboa, "agente" ere deitua), *noren, nori, norekin, norentzat, norengan...* eta beste deklinabide-atzizki guztiak. Zer egin N atzizki erlatiboak ondo adierazten dituen NOR, NORK eta NORI ez beste guztiekin? Hona erdarazko adibide zerrenda bat:

- *No utilices conceptos cuyo sentido desconoces. Los pensionistas cuya anualidad no supere los cuatro mil euros, quedarán exentos de declaración. Las empresas cuya contabilidad no haya sido sometida a una auditoría, deberán presentar... Los países cuyas posibilidades de desarrollo se basan en el petróleo, se encuentran ante el siguiente dilema... Yo como sólo la fruta cuyo color me recuerda a Gauguin.*

- *Hay personas de quienes nunca consigues saber más de lo que preguntas. A veces, gente de la que oíste perrerías no es tan fiera como la pintan. Es una cuestión de la que no conozco más que su existencia. Ése es el hombre de quien necesito tener tu información.*

- *Una persona con la que has vivido tantos años no puede ser ajena a tu vida. Suponiendo que el matrimonio sea bueno, tú eres el último con quien me casaría. ¿Será ésta la oportunidad con la que soñaba encontrarme? Sólo me planteo negocios con los que puedo obtener dinero y prestigio.*

- *La empresa para la que trabajo se halla a punto de quebrar. Un hombre para quien lo más importante es su trabajo, dificilmente puede... Es un oficio para el que no necesitas mucho talento. No es fácil amar a un jefe para quien no eres más que un número.*

- *Ahí teneis el mundo al que nos lleva este sistema. Ahí teneis el planeta hacia el que se dirige nuestro satélite. Ahí teneis la Roma a la que dicen conducir todos los caminos.*

- *Así surgió la Grecia en la que todos desearíamos haber vivido alguna vez. Un Dios en quien ves justicia y castigo puede ser temido, pero no amado. Hasta el momento, hemos encontrado el único punto en el que coincidimos. Pasamos unas vacaciones en las que mi ilusión se convirtió en desgracia.*

Euskaraz ez daukagu kasu horiek guztiak zuzen adieraziko dituen erlatiborik, nahiz eta, kasu-konkordantzia dagoenean, kasu hauek ere erlatiba daitezkeen. Adibidez: "Hainbeste urtetan bizi izan zaren pertsonarekin ezin zara haserretu orain". Orduan zer erabaki? Esaldia aldatu edo itzulinguru bat egin? Horrela, lehen adibidea itzul liteke: *Ez ezazu esanahi ezagunik gabeko kontzepturik erabil.* Edo erlatibo hori era zuzenean adierazteko moduko beste erlatibo batera ekarri: *Ez ezazu ezagutzen ez duzun kontzepturik erabili.* Edo: *Ez ezazu zer esan nahi duen ez dakizun kontzepturik erabili.*

Soluzio hori neketsu eta erneguqarri gertatu ohi da azkenerako. Eta oso arbitrarioa, bakoitzak ahal bezalako saihesbideak asmatzen baititu. Hona proposamen zehatza: aditzak berak zuzen adierazten ez dituen kasuetan, erlatibatutako kasu horiek IZENORDAIN ERAKUSLE bategaz(edo ADBERBIO ERAKUSLE bategaz) iragarri, eta gero erlatibo normala aplikatu. Erdaraz jarritako adibideak itzuli aurretik, hona esaldi laburren sorta bat, hizkera kolokialean noiznahi gertatu ohi direnetakoak:

– *Hemen duzue bere begiekin maitemindu nintzen laguna. Hemen duzue orain beragaz bizi naizen laguna. Hemen duzue sekula beragatik txarrik esango ez nukeen laguna. Hemen duzue beragandik edozer itxaron dezakezun laguna. Hemen duzue beragan konfiantza osoa izan dezakezun laguna. Hemen duzue berataz edozertarako fida zaitezkeen laguna. Hemen duzue beretzat lan egiten dudan enpresa. Hemen duzue bertan buruko mina besterik aurkitu ez dudan lantokia. Horra hor bertara sekula joango ez nintzatekeen inguru bakarra.*

Probatu izan dut esaldiok lehenengoz entzuten zituztenekin, eta guztiz natural iruditu zaizkie. Baina euskal gramatiketan ez dago soluziorik kasu horientzat, non ageri diren erdarazko: *cuyo, con quien, por quien, de quien, en quien, sobre el que, para el que, donde, adonde*. Berdin jarrai zitekeen honakoekin: *beragana, beragandiko, bertarantz, bertako*... eta denak. Gatozen orain arestiko erdal esaldi konplexuagoak itzultzera, nahiz eta, funtsean, egitura beraren aplikazioa besterik ez den:

- *Ez ezazu bere esanahirik ezagutzen ez duzun kontzepturik erabil. Euren urtekoa laurehun eurotik gorakoa ez den pentsionistak deklaraziotik libre geldituko lirateke. Euren kontaduria auditoria baten mende jarria izan ez den enpresek aurkeztu beharko dute... Euren aurreramena petrolioan datzan herriak honako dileman aurkitzen dira. Bere koloreak Gauguin oroitarazten didan fruta bakarrik jaten dut.*

- *Badira galdetzen duzuna baino gehiago haietaz jakiterik inoiz lortzen ez duzun pertsonak. Batzuetan, hartaz zakurkeriak entzun dituzun jendea gero ez da dioten bezain izugarria. Bere existentzia baizik ez dakidan auzia da. Horra hor hartaz zure informazioa behar dudan gizona.*

- *Hainbeste urtetan beragaz bizi izan zaren lagun bat ez daiteke zure bizitzagaz zerikusi gabea izan. Ezkontza ona dela emanik, beragaz ezkonduko nintzatekeen azkena zara. Hau ote da beragaz topo egitea amesten nuen aukera? Eurekin dirua eta ospea lor dezakedan negozioak bakarrik planteatzen ditut.*

- *Harentzat -hartarako- lan egiten dudan enpresa porrot zorian dago. Beretzat gauzarik behinena lana den gizonak nekez dezake... Hartarako talentu handirik behar ez duzun ofizioa da. Beretzat zenbaki bat besterik ez zaren nagusia maitatzea ez da erraza.*

- *Hor duzue sistema honek harantz (bertarantz) garamatzan mundua. Horra hor gure satelitea harantz (bertarantz) doan planeta. Hor duzue bide guztiek bertara omen daramaten Erroma.*

- *Horrelaxe sortu zen bertan noizbait bizi izana denok nahiko genukeen Grezia. Beragan justizia eta zigorra ikusten duzun Jainkoa izan daiteke beldurgarria,*





*baina ez maitea. Orain arte, hartan bat gatozen puntu bakarra aurkitu dugu. Haietan nire ilusioa zorigaitz bilakatu zen oporrak igaro genituen.*

Nik baino gehiago dakien batek honako iruzkina proposatu dit, guztiz neure egiten dudana:

"Hiru kontu garrantzitsu. a) Neronek aipatuko nuke Altube ere irtenbide honen aldekoa izan zela bere garaian. b) Gomendatzen dizut Euskaltzaindiak bere gramatikan (EGLU V-1, 190, 191, 217) dioena irakurtzea: dirudienez, ez du izenordain eta adberbio erresuntibo horien erabilera erabat gaitzesten. 39c eta 111a adibideak (bigarrena, norena eta Agirre Asteasukoarena!) ontzat ematen dituela dirudi. c)Agian zure liburuan esan beharko zenuke euskararako proposatzen duzun irtenbide hau ahozko gaztelaniaz ("el hombre que vivo con él" eta horrelakoak), ahozko gainerako hizkuntza erromanikoetan eta beste hainbat hizkuntzatan ere gertatzen dela maiz".

Adibide hauetako batzuetan, erakuslea ezabatuta ere, kontestuak eta zentzuak ondo adierazten du erlatiboaren izaera. Esaterako:

- *Ez ezazu esanahirik ezagutzen ez duzun kontzepturik erabil. Badira galdetzen duzuna baino gehiago jakiterik lortzen ez duzun pertsonak. Horra hor zure informazioa behar dudan gizona. Hau ote da topo egitea amesten nuen aukera? Dirua eta ospea lor dezakedan negozioak bakarrik planteatzen ditut. Talentu handirik behar ez duzun ofizioa da hori. Orain arte, bat gatozen puntu bakarra aurkitu dugu. Nire ilusioa zorigaitz bilakatu zen oporrak igaro genituen.*

Adibide horietan guztietan, bistan da *bere, hartaz, harekin, hartarako, hartan, haietan* edo antzeko zerbait adierazten dela. Eta bistan ez badago, edo ez dagoela uste bada, jarri izenordain edo adberbio erakuslea, eta kito. Azken batez, hauek gabeko soluzioak ez dira erlatibo normala beste kasuetara korriarazteko kasuak besterik; arestian luzeago azaldu bezala, uste baino gehiago aurreratua genuen bidean, NEKO delako forma horregaz dena nahasten hasi garen arte. Nork ez ditu normal esan edo entzun honelako esaldiak? *Egunero izaten dut tonto jartzen naizen uneren bat, eta orduan telebista pizten dut.* Edo: *Egunero daukat uneren bat tonto*

*jartzen naizena, eta*... Hemen bistan da NON kasua dagoela azpian. Erdaraz *momento en el que. Zu zara ni ondoen konpontzen naizen laguna.* Hemen bistan da *konpondu* aditzak *norekin* daramala azpian. *Bazkal aurrea izaten da logurak gehien erasotzen didan ordua.* Hemen NON-NOIZ bat dago azpian. Erdaraz, *la hora en que, la hora cuando.*

Esaten ari garen guztiak ez du esan nahi, euskaraz, erlatibozko forma batzuek erdarazko egitura berbera ukan behar dutenik. Esaterako, arestiko erdal esaldien zerrendako bigarrena honela hobeto legoke, agian: *Euren urtekoa lau mila eurotik gorakoa ez duten pentsionistak deklaraziotik*... Edo: *Lau mila eurotik gorako urtekorik ez duten pentsionistak*... Edo laugarrena: *Aurreramena petrolioan oinarritua daukaten herriak honako dileman aurkitzen dira.* Euskaraz, IZAN ordez UKAN erabiltzea naturalago da sarritan, batez ere, genitiboan, honek gehienean posesio edo edukitze zentzua baitauka. Erdaraz oso normala da: *Una familia cuyos miembros se hallan tan dispersos no puede*... Euskaraz, itzul daiteke: *Bere kideak hain zabal dituen familiak ezin du*... Gaizki al legoke: *bere kideak hain zabal dabiltzan familiak ezin du...?* Edo: *Un negocio cuyo principal objetibo consiste en la ganancia no repara en consideraciones humanas.* Euskaraz: *Irabazia helburu nagusitzat daukan negozioak ez die giza kontsideroei begiratzen.* Edo: *Bere helburu nagusitzat irabazia duen negozioak*... Gaizki al legoke: *Bere helburu nagusia irabazian datzan negozioak ez die giza kontsideroei begiratzen*? Hau gaizki ez egoteak ez du esan nahi bestea hobeto ez legokeenik.

Dena dela, kontestuak edo zentzuak kasu gutxienak konponduko ditu beti ere, balidabide honekin. Beharbada, erabilienak izango dira. Horrexegatik dira, hain zuzen, ulergarriak. Baina hortik harago, arlo handia gelditzen da, itzulinguru arbitrarioen mende uzteko baino garrantzi handiagoa daukana. Baliteke batzuei ez iruditzea beharrezko, edo itzulingurua aski soluzio iruditzea. Zenbait kasutan, itzulpen literala baino hobeak badaudela deskubritzen ez naiz orain hasiko. Aurkitu izan ditut filologia irakasleak, esanez:

- *Guk zertarako behar dugu 'cuyo' eta horrelakorik?*

Genitiborik ez dela behar esatea bezala. Baikortasun horrek harritzen nau, baina bego. Inolako erlatiborik gabeko hizkuntzak ere egongo dira, agian, eta bakoitzak nahi duen moduko hizkuntza erabiltzeko eskubidea dauka. Baina badira euskaraz ere erlatiboaren eremu osoa hartu nahi luketenak, eta hauentzat mintzo naiz, neure burua tarteko.





Ez hori bakarrik. Erlatiboaren kasu guztiak ustez konpondurik, eta euskarak bereak dituen egitura originalak baliaturik, behin baino gehiagotan gertatuko da inguruko hizkuntzek ez dituzten edo haietara nekez itzul daitezkeen esaldiak sortzea. Hona adibide bat, neuk *Joan ziren* zikloko liburuki batean erabilia: "*Ez bagina trabatuko ondorioa euren gorabeheran balego bezalako preliminar jada itxietan*". Erlatibo hutsean litzateke: "*Ez bagina trabatuko ondorioa euren gorabeheran legokeen preliminar jada itxietan*". Baina erlatibo soil bat izatekoa baldintzazko gehi 'bezalako' modalagaz fusionatu da. Orduan, gaztelaniara, behintzat, literaltasun zuzen eta naturalez itzuli ezin den esaldia atera zaigu.

Atal hau amaitzeko adibide bat jarriko dut, erlatibo mota ezberdinak elkarrekin trukatuz edo bakoitza eraz aldatuz, osotasuna hobeto eta argiago hautemateko balio dezakeena. 'Elkarrekin trukatu' diot, zeren, izan ere, erlatiboa hiztunaren edo adieraztunaren intentzio bat besterik ez baita. Itzulpenak intentzio horrekiko leialtasuna gorde behar du; eta intentzioa izan liteke, beste gabe, esaldiko elementuen ordena soila ere. Intentzioaren jabeak erlatibo murrizgarritzat erabili duenari berdin eman diezaioke ez-murrizgarri maila, zerbaitegatik hala komeni zaiola pentsatu badu. Baina hori egilearen eskumena da, ez itzultzailearena. Edo esaldiaren ordena alda dezake, eta orduan joskera edo egitura ezberdinak beharko ditu. Diodan, adibidez:

- *Zu ez al zara bere argazkia telebistan zabaldu zuten atrakatzaile hura?*

Erlatibo hau era murrizgarrian josita dago. Esan nezakeen beste honela ere:

– *Zu ez al zara atrakatzaile hura, zeinaren argazkia telebistan zabaldu zuten?*

Erlatibo hau era ez-murrizgarrian esana da. Baita esan nezakeen:

– *Zu ez al zara atrakatzaile hura, bere argazkia telebistan zabaldu zutena?*

Oraingoa aposizioan josita doa. Kontestuak justifikatu behar duen zerbaitegatik, 'telebistan' hitza azkenerako gorde nahi badut, esan nezake:

*– Zu ez al zara atrakatzaile hura, bere argazkia zabaldu zutena (zeinaren argazkia zabaldu zuten)... telebistan?*

Baita pentsa nezake 'atrakatzailea' azken uztea ere, honela:

*– Zu ez al zara hura, bere argazkia telebistan zabaldu zuten... atrakatzailea?*

Era honek kasik erlatibo bikoitzaren inpresioa eragiten du. 'Atrakatzailea' beste honela ere utz nezakeen, noski, azken:

*– Zu ez al zara bere argazkia telebistan zabaldu zuten atrakatzailea?*

Baina orduan elementu garrantzitsu bat eliminatu dugu, 'hura', aurretik iragarle jarrita, batez ere (*zu ez al zara hura...*), suspentsea sortzen duena. Azken aurreko era, 'atrakatzailea' azken uztekoa, gaztelaniaz horrela natural ordenatzea zaila da. Hasi nahi baduzu: "¿Tú no eres aquél cuya fotografía...?", ea gero nola utzi behar duzun azken 'el atracador'.

Azkenik, baita esan dezaket, 'bere' ezabatuta: *Zu ez al zara argazkia telebistan zabaldu zuten atrakatzaile hura?* Edo: *Zu ez al zara atrakatzaile hura, argazkia telebistan zabaldu zutena?*

Ia beste kontestu gabe, argi dago elementu ezabatua NOREN dela; kasu honetan, BERE. Gaztelaniaz ez dakit nola ezaba litekeen 'cuyo' edo 'de quien', esaldia zatitu gabe. Euskaraz ere, kasurik gehienetan, ezabatze hori ezingo da burutu, esanahia kolpatu gabe.

Aipatutako erlatibo-era guztiak ez dira, noski, espresio berdinekoak. Behar dena da aukera espresibo guztietarako era naturalak edukitzea. Horrela ez dugu jo beharrik izango mozketaren baliabide infantilera, adibidez:

*– Zu ez al zara atrakatzaile hura? Zure argazkia ez al zuten telebistan zabaldu?* Edo, ordena aldaturik: *Zure argazkia ez al zuten telebistan zabaldu? Zu ez al zara atrakatzaile hura?*





Erdibitzea baliteke egokia izatea, adieraztunak era espresibo puskatu horixe nahi badu, baina, aurreko perpaus erlatiboen ordaintzat aurkeztu nahi badu, inpotentzia gajo bat besterik ez du adierazten.

Hona beste adibide bat, bariazioen zerrenda guztiagaz:

*– Sortuko ahal dira eurengatik arima saltzea ere onartuko nukeen maitasun berriak edo bizio zaharrak.* (Aholkulariak diost: "Dirudienez, honelako kasuetan Euskaltzaindiko gramatikak izenordain erresuntiboa onartzen du). *Sortuko ahal dira maitasun berriak edo bizio zaharrak, zeintzuengatik arima saltzea ere onartuko nukeen. Sortuko ahal dira maitasun berriak edo bizio zaharrak, zeintzuengatik onartuko nukeen arima saltzea ere. Sortuko ahal dira berriak edo zaharrak, eurengatik arima saltzea ere onartuko nukeen maitasunak edo bizioak. Sortuko ahal dira maitasun berriak edo bizio zaharrak, eurengatik arima saltzea ere onartuko nukeenak.*

Hauetan, erlatiboaren iragarlea ('eurengatik') ezabatzeak iluntasun handiegia lekarke. Azken bariazioan, berriz, konkordantzia-kasu bitxi bat gertatzen da. Horretaraxe goaz, hain zuzen.

## *Erlatiboaren konkordantzia-arazoak*

Erlatiboaren aplikazio zabalago honek konkordantzian arazoak ekarriko ditu, erlatibozko perpausa atzera pasatzean, batez ere. Adibidez: *Egunero izaten dut uneren bat, tonto jartzen naizena, eta orduan telebista pizten dut.* Baina, une bat izan beharrean, '*uneak*' plurala balitz? Orduan: *Egunero izaten ditut uneak, tonto jartzen naizenak, eta orduan telebista pizten dut.* Batetik, *naizenak* horren subjektua singularra da, *Ni*, baina bestetik, pluraldu egin behar da, *uneak* pluralarekin konkordarazteko. Eta zergatik ez: *Egunero izaten ditut uneak, tonto jartzekoak, eta orduan telebista pizten dut*? Ondo dago, baina hemen ere gako berdintsua dago azpian, erabilerak, agian, ulergarriago egiten badigu ere.

*Uneak* eta *jartzekoak* zenbakian bat datoz, baina uneak eurak ez dira tonto jartzen direnak. Neu naiz une haietan tonto jartzen naizena.

Beste adibide bat: *Hay personas con las que ni siquiera puedes hablar, y otras con las que puedes comentar cualquier cosa.* Euskaraz: *Badira pertsonak, eurekin hitzik ere egin ezin duzunak, eta beste batzuk, eurekin edozer komenta dezakezunak.* Erlatiboa ekidin daiteke, noski: *Pertsona batzuekin hitzik egiterik ere ez daukazu, eta beste batzuekin edozer komenta dezakezu.* Edo: *Badira pertsoñak hitzik ere egin ezin diezunak, eta beste batzuk edozer komentatzeko modukoak.* Izango da era gehiago eta hoberik ere. Baina sarritan gertatuko zaizkizu itzulinguru trakets batez beste aukerarik uzten ez dizuten kasuak. Eta esamolde berdintsu posibleak egonik ere, sekula ez dira guztiz berdinak. Beti dago ñabardura ezberdinen bat, eta ñabardura oso garrantzitsua da hizkuntzan, batez ere, literaturan. Egitura funtzional soil baten ordezko bila beti ibili beharra baliabide nekagarria eta primarioegia da.

*Olatua kuartelen gainetik* izeneko neure azken liburuan, honakoak idatzi izan ditut, batuan eta bizkaieran:

– *Zuek al zarete ni sarritan lapurrak zirela ziur egon naizenak?*
– *Mirariak ziren, ez hainbeste, astea haietarako antolatua genuen solasengatik, baizik...*
– *Giza espeziearekiko nire sentiera halakoaren baikortasunera hurbiltzen zen, zeina eskela-orrietan lasaitzen baitzen, hainbeste etsai eliminatuak zirela ikusiz.*
– *Gure osaba denok haregaz ikaratzen zinduezen mehatxu apokaliptikoa ("Torreburun handiena gertatuko da") bete barik joan zen gero!*

Azken adibide bi jarriko ditut, problema eta soluzioa batera argitzen lagunduko digutenak.

– *Baditut premonizioak, gertatuko direla badakidanak, baina burutik kendu ezin ditudanak.*
– *Baditut egunak, beltzak izango direla aurreikusi dudanak, baina gero hain gaizki bukatzen ez direnak.*

Lehen adibidean, 'badakizkidanak' jartzeko tentazioa datorke. Premonizioa singularra balitz, ez legoke dudarik: *Badut premonizio bat, gertatuko dela badakidana.* Baina plural horrek ez du 'badakit' aldatzen,





honen konplementua ez baita 'premonizioak', 'aldatuko direla' baizik. Erlatiboa hautsita ikusten da argi: *Baditut premonizioak, eta badakit gertatuko direla.* Esaldia erlatibo bihurtzeak ez du 'badakit' aditzaren konplementua aldatzen.

Bigarren adibidean ere, 'aurreikusi ditudanak' ez litzateke zuzena, ez baitira 'egun beltzak' aurreikusten direnak, 'izango direla' baizik. Egun beltzak izango direla aurreikusten 'dut'.

Erlatiboaren eremu zabal honek, hizkuntzak sor ditzakeen kasu eta perpaus-ordena guztiekin, zehaztu beharreko problema asko plantea dezake, baina utz dezagun, oraingoz, horretan, ez baita gutxi planteatu dena, eta, ustez, konpondu dena.

## Aposizioen konkordantzia

Erlatiboaren konkordantzia-arazoak konpontzen saiatu garenez gero, diogun zerbait perpaus orokorraren konkordantziaz ere. Euskararen sintaxia inguruko erdaren hain ezberdina izanik, konkordantzian oso arazo ezberdinak sortzen dira. Elementu ezberdintzaile bat ergatiboa da. Aditz bata transitiboa eta bestea intransitiboa direnean, subjektuak, beti, jokatzen den aditzagaz joan behar du. Txarto: *Lapurrak gu ikusi eta joan egin zen.* Ondo: *Lapurra gu ikusi eta joan egin zen.* Txarto: *Lapurra gugana hurbildu eta esan zigun.* Ondo: *Lapurrak gugana hurbildu eta esan zigun.* Okerrago litzateke, bi aditzetako bat menpekoa denean, beste aditzaren subjektua beronegaz konkordatzea: *Lapurra, gugana hurbildurik, esan zigun.* Ondo legoke: *Lapurra gugana hurbildu zen eta esan zigun.* Kasu honetan, biak jokatzen direnez, subjektua lehenengoari, hurbilenari datxeko, eta bigarrenean ezabatu egin da. Izan daitezke salbuespenak. Deklamazio batean, esaterako, bi aditzak urrunduz, suspentse bat edo beste efektu bat lortu nahi izan liteke: *Lapurra gugana hurbildu... eta tiro egin zigun.* Kasu horretan, tarte oratorioak, justifikatu ez ezik, eskatu ere egiten du salbuespena.

Aposizioa da beste arlo luze bat, arazo ezberdin ugari sortzen duena. Kasu bat da hiru-lau hitz segida batean doazena, hots, kopulatiboa,

baiezkoa, ezezkoa... (*eta, bai, ez...*) esplizituki agirian edo komapean ezabaturik doazena. Horietan, denek kasu berean joan behar dute: *Gizonekin, emakumeekin eta umeekin.* Deklinabidea horrela errepikatzea astunegi da, ordea, efektu erretorikoren bat tartean ez badago. Normalena azkena bakarrik deklinatzea da, baina orduan aurreko guztiak deklinatu gabe utzi behar dira. Txarto: *Gizonak, emakumeak eta umeekin.* Ondo: *Gizon, emakume eta umeekin.* Txarto: *ura eta ardoaren artean.* 'Ura' kasu absolutuan dago, eta 'ardoaren', genitiboan.

Erdaren deklinabidea preposizio bidez osatzen denez, hitza beti atzetik gelditzen da, ondorengo edozer beragaz zuzenki konkordatzeko moduan. Euskararen deklinabideak zaildu egiten du kasu berean joan behar duten aposizioak egitea. *Hemen dagoz arrainak, fresko-freskoak.* Horrelakoetan (kasu absolutuetan), ez dago problemarik. Baina nola konkordatu, euskaraz, preposiziodun hizkuntzetan hain normalak diren beste kasu guztiak? Esaterako: *Escuchemos las palabras del acusado, presunto culpable del homicidio.* Euskaraz, lehenik eta behin, 'akusatuaren hitzak' litzateke. Genitiboa aurrera pasatu da, eta beragaz aposizio egiteko bigarren terminora bitartean, 'hitzak' sartu da. Honela itzul daiteke: *Entzun ditzagun akusatuaren hitzak, homizidioaren ustezko errudunarenak.* Edo: *Entzun ditzagun akusatuaren, homizidioaren ustezko errudunaren, hitzak.* Lehenengoa naturala da, esaldia nahiko sinplea baita. Bigarrena zuzena da, baina esaldiaren ordena eta oreka bortxatzen dira. Zerbaitegatik, 'hitzak' azkenerako gordetzea komeni balitz, ondo legoke, efektu gisan, baina ez da ikusten kontzeptu hori azkenerako gordetzeko arrazoirik, erruduna mutua edo ez bada. Edo, 'hitzak' izan beharrean, 'uluak', 'marruak' edo horrelako zerbait ez bada. Esaldia konplexuago denean, berriz (beste elementu batzuk tartean doazelako), baliabide iluna gertatu ohi da.

Hona beste adibide bat: *Me quedé maravillado de los árboles de aquella selva, altos y corpulentos como torres.* Txarto: *Harriturik geratu nintzen oihan hartako zuhaitzekin, dorreak bezain garaiak eta sendoak.* Horrela, 'zuhaitzekin' eta 'garaiak-sendoak' ez daude ondo konkordatuak. Soluzio bi daude. Bata: *Harriturik... zuhaitzekin, dorreak bezain garai eta sendoekin.* Bestea: *Harriturik... zuhaitzekin, torreak bezain garai eta sendoak eurak-berak.* Aurreko paragrafoko adibidea ere itzul zitekeen horrela: *Entzun ditzagun akusatuaren hitzak, homizidioaren ustezko erruduna bera.*





Lehenengo soluzioa (aposizioko termino guztiak berdin deklinatzea), sarritan ezinezko gertatzen da, esaldiaren konplexutasunagatik, edo astunegi, errepika itsusiagatik. Orduan, bigarrena da praktikoena, non aposizioa, erakusleagaz, beste esaldi bat bezala eraikitzen den.

Jar dezagun beste adibide bat: *Las palabras del presidente, vestido de gala para la ocasión y acompañado de su esposa, fueron aplaudidas con entusiasmo.* Euskaraz: *Presidentearen hitzak, galako jantzirik eta emazteak lagundurik bera, sutsuki txalotuak izan ziren.* Badago joera bat, honela esatekoa ere: *Galako jantzitako eta emazteak lagundutako presidentearen hitzak sutsuki txalotuak izan ziren.* Oker dagoenik ezin da esan, baina esaldiaren espresioa asko aldatzen da, aposizio esplikatiboa, ez-murrizgarria, bereizle edo murrizgarri bilakatzen baita. Esaldi originalean, "*vestido de gala para la ocasión y acompañado de su esposa*" zatia presidentearen gehigarri esplikatzaile bat bezala dator. Bigarren itzulpenean, izaera hori aldatu egiten da. Beraz, oker dagoenik ezin dela esan baieztetik hasi garena, azkenean, ez dago hain zuzen. Eta esaldiaren oreka ere asko aldatu da.

Hona azken adibidea: *Sucedió en numerosos procesos, incoados pero no resueltos en su mayoría, que los imputados ni siquiera sintieron el pudor de desaparecer temporalmente del pueblo.* Euskaraz: *Hainbat prozesutan, hasiak baina gehienbat ebatzi gabeak eurak, gertatu zen inputatuek ez zutela sentitu herritik denbora batez aldentzeko begirunerik ere.* Esaldi honetan 'gertatu zen' aditza aposizioaren atzera pasaturik dago. Horrela gustatzen ez zaionak egin lezake: *Hainbat prozesutan gertatu zen, hasiak baina gehienbat ebatzi gabeak eurak, inputatuek ez zutela sentitu herritik denbora batez aldentzeko begirunerik ere.* Orduan, 'gertatu zen' aditza aposizioko terminoen erdian geratzen da, traba nabarmena eginez. Aposizioaren atzetik konpletibo bat datorrela iragartzeko, EZEN partikula ere sar liteke. *Hainbat prozesutan gertatu zen ezen, hasiak baina gehienbat ebatzi gabeak eurak, inputatuek ez zutela sentitu herritik denbora batez aldentzeko begirunerik ere.* Oraingoan, gauza bat argitu nahian, aposizioa guztiz iluntzea lortu dugu. Oro har, esaldi osoa hondatu dugu.

Garbiena honakoa litzateke: *Gertatu zen hainbat prozesutan, hasiak baina gehienbat ebatzi gabeak eurak, inputatuek ez zutela sentitu herritik*

*denbora batez aldentzeko begirunerik ere*. Kasu honetan, aposizio hertsia ere ez legoke gaizki: *Gertatu zen hainbat prozesutan, hasiak baina gehienbat ebatzi gabeetan, inputatuek ez zutela sentitu herritik denbora batez aldentzeko begirunerik ere*. Bigarren baliabide hau ez dator beti berdin egoki. Orduan lehenengora jo daiteke, hau ia beti baitator ondo.

"Azken jarri beharrekoa" omen zen aditza lehenen jartzeari muzin egiten diotenek segi dezatela eurenean, baina euskarak esaldia ordenatzeko hain ahalbide ezberdin ugari onartzen badu, ahalbideok erabiltzeko eta soluzioak emateko dira, batez ere, esanahia eta argitasuna jokatzen direnean. Norbaitek berriro izan dezake tentazioa bi paragrafo goragoko adibidean aipatu duguna baliatzeko. Hots, aposizio esplikatiboa bereizle edo murrizgarri bihurtu, honela: *Hasitako baina gehienbat ebatzi gabeko hainbat prozesutan gertatu zen inputatuek ez zutela sentitu herritik denbora batez aldentzeko begirunerik ere*. Hori esan nahi izan balitz, ondo legoke, baina gaztelaniaz eman dugun esaldi originalarentzat, soluzio bortxatua izateaz gainera, esaldiaren oreka eta esanahia aldatu egin dira.

Beste tentazio oker bat izan liteke itzulpengintzan maiz aholkatzen den mozketa edo esaldia bitan zatitzea. Honela, adibidez: *Hainbat prozesu hasi, baina gehienbat ebatzi gabe gelditu ziren, eta inputatuek ez zuten sentitu herritik denbora batez aldentzeko begirunerik ere*. Metodo honi arlote eta baztergarri deritzot. Esaldi originalaren itxura eta intentzioa guztiz apurtzen dira. Ezin dugu esaldiak arbitrarioki aldatzen edo moldatzen jardun, egitura funtzional argi eta soil bat ez edukitzearren. Okerrena da euskarak badituela, sarritan, moduak, edo gutxi eraginda izan ditzakeela, soluzio argiak eta onak emateko, aurreiritzi latenteen lastagatik ez balitz. Aurreko paragrafoko bi esaldiak (kasu honetan, itzulpenak zirenak) argiak eta orekatuak badira, zertarako hasi behar da elementuak lorrintzen, nahiz eta aditza lehenen eraman?





## Perpausaren ordena

Euskaraz, aditz piloa dago bi elementuz osatzen dena: *Behar/lan egin, negar egin, parte hartu, behar izan, huts egin, hitz egin*, eta abar. Iparraldeko estiloa esageratuz-edo, bi elementuen ordena ia sistematikoki aldatzeko mania sartuta dago: *Goizez bakarrik egiten dut lan; herritar guztiek hartu zuten parte jaian; derrigor behar duzu etorri bazkaltzera; jokalari guztiek egin zuten huts bigarren partean; beragaz egin nuen topo*... Esaldi hauek txarto dagozenik ezin da esan, baina bai arrotz samarrak direla. Aditzaren elementu biak unitate bakartzat hartu behar dira, aditz bakartzat. Aditza ez da *egin lan, hartu parte, egin topo* (aginduzkoan ondo leudeke horrela), alderantziz baino. Galdegaiaren arrazoia emateak ez du balio. Aditzak beti dauka elementuren bat inguruan. Beti dauka galdegaia. Egia da honelako aditzek, enfasi handiagoa ezartzea edo beste efektu posible batzuk lortzea komeni denean, ordena aldatzeko baliabide interesgarria ematen dutena. Baina, aldakuntza sistematikoa izanik, gero nola egin behar dugu bereizkuntza? Naturalenak honakoak dira: *Goizez bakarrik lan egiten dut; herritar guztiek parte hartu zuten jaian; derrigor etorri behar duzu bazkaltzera; jokalari guztiek huts egin zuten bigarren partean; beragaz topo egin nuen.*

Beste mania bat esaldi osoaren ordena ia sistematikoki aldatzea da: *Jai handia egingo dute aurten ere euren zaindariaren egunean auzokoek; gura baduzu izan film eder bategaz gozatzeko aukera...; ez dutela aurrekonturik prestatu oraindik adierazi zuen alkateak*. Adibideak ehundaka aurkituko dituzue egunkari zein aldizkarietan, esaldiak horrela josteko estiloa, intentzio espresiboetatik aparte, sistematiko bihurtzen ari baita. Ez da idazkera jasoaren kontua, nondik eta nola sartuz doan ez dakigun bizioa baizik. Txarto al dago? Ez. Hemen txarto ez dago ezer, norberak nahi duen moduan idaztea eskubide bat bada, baina esaldi horiek, oraintxe ere, beste honetara naturalago dira: *Auzokoek aurten ere jai handia egingo dute euren zaindariaren egunean; film eder bategaz gozatzeko aukerarik izan gura baduzu; alkateak adierazi zuen oraindik ez dutela aurrekonturik prestatu.*

Galdegaiaren kontuan, ez da egia aditzak azken joan behar duenik eta horrelakorik. Aditza ardatza da, hori bai. Baina ardatzaren toki naturala erdialdea izan liteke. Eta egia da (literarioki emankorra, gainera),

euskarak esaldia era askotara ordenatzeko aukera zuzenak ematen dituela. Horregatik, esaldiaren ordenagaz jokatzea dohain literarioa izan liteke, eta da. Baina, horretarako, efektuen jokoak argi egon behar du, intentzioek justifikatuak izan behar dute. Bestela, uzki-bistan geldi liteke. Esaldi neutro samarretan, aparteko efekturik ageri ez denean, ordena naturala aldatzen hasi beharrik ez dago. Badakit 'naturala' oso kontzeptu erlatiboa dena, baina, esaterako, subjektua behintzat, normalean, aditzaren aurretik joatea naturala izango da, ezta?

## *Singular-pluralak*

Gaztelaniaren jitea zenbait hitz pluralean erabiltzea da: *Tener oportunidades, medir fuerzas, dar ánimos, vientos favorables, ganas, probabilidades, relaciones, dolores, ardo en deseos, dudas al respecto, tiene jadeos, trazas-pintas, hacerse ilusiones...* Euskaraz, horietako bat bakarra nahikoa dugu: *Irabazteko aukera daukat, indarra neurtu, animoa eman, gogoa eduki, probabilitatea, ilusioa, asmoa, harremana/harremanean, desioa, kontenplazioan* ('en contemplaciones'), *mina, arnasestua, aldeko haizea dabil, duda daukat/dudan nago, euria egiteko itxura dauka* ('trazas de llover'), *kaka egin* ('hacer cacas'), eta abar.

Aurreko hitzok eta singularrean erabiltzen dituen beste asko indartzeko, gaztelaniak, gehienean, 'mucho-poco' darabil. Euskaraz, 'handi-txiki' adjektiboekin indartzen dugu: *indar handia, gogo handia, probabilitate handia, aukera handia, posibilitate, ilusio handia, talentu handia, haize handia, min handia, itxura handia, lupetz handia...* Txikitze kasuan, kastellanismoa sartuago dago (*aukera gutxi, probabilitate gutxi, gogo gutxi...*), baina ez legoke gaizki simetriara bueltatzen ahalegintzea, kastellanismoari aurrerantz bultza egin beharrean: *aukera txikia, probabilitate txikia, animo txikia, itxura txikia...* Bai handitzeko, bai txikitzeko, beste adjektibo batzuk ere erabili ohi ditu: *gogo itzela, haize galanta, aukera latza; itxura kaxkarra, min arina...*

Denbora-espazioen kasuan, indargarritzat 'luze-labur' adjektiboak erabiltzen ditugu: *bide luzea, denbora luzea, partida luzea* = mucho camino, mucho tiempo, mucho partido. Bide asko = bide bat baino gehiago. *Oraindik partidu asko geratzen da* = partida batzuk baino gehiago. Bakarra bada, *partida luzea, bide luzea.*





## *Izen baten menpeko perpausak*

Hitz baten menpean dauden perpausak etengabeak dira hizkuntzan. Bera da egiturarik garrantzitsuenetako bat, eta horixe da euskararen beste arazo handietako bat. Euskaraz, menpetasun laburretarako badiltugu era batzuk, N, REN, LAKO, T(Z)EKO... atzizkiekin, segun zalantza, zehar-galdera, erlatiboa, konpletiboa, genitiboa... eskatzen duten. Erdaretan, gaztelaniaz behintzat, kasurik gehienak DE edo DE QUE partikulez konpontzen dira.

N: *Ez daukat inor etorriko den itxaropenik. Ez dago atertuko duen antzik. Ez daukat arazo guztiak gaindituko dituzun zalantzarik. Ez ezazu izan traiziorik egingo dizudan beldurrik.* Perpausa hauek menpekoa atzera pasaturik ere, oso naturalak dira: *Ez daukat itxaropenik inor etorriko denik. Ez dago antzik atertuko duenik. Ez daukat zalantzarik arazo guztiak konponduko dituzunik. Ez ezazu izan beldurrik traiziorik egingo dizudanik.*

LAKO: Zehar-galderazko eta menpetasunezko forma hori (beti ez dago argi zein den bata eta zein bestea) nahikoa ez denean, hots, esanahia ilun gelditzen denean; edo, soilik, atzizki hori eskatzen ez duten kasuetan, LAKO atzizkiak zehazten du lotura. *Krisiak hondoa jo duelako baieztapen horrek ez dauka funtsik. Unibertsoak hasiera bat izan zuelako teoria zientifikoki frogatzea zaila izango da. Lehengo garaiak hobeak izan zirelako oinarri nagusia izan liteke gaztetasuna, adin batetik gora, beti atzean ikusten dela.* Forma hau, azken aldion, esperpento bategaz ordezten ari da, konpletiboari genitiboa erantsiz: *Hondoa jo duelaren baieztapen horrek. Hasiera bat izan duelaren teoria. Garai hobeak izan zirelaren oinarri nagusia.* Degradazio nabarmena.

T(Z)EKO: Forma hau, batez ere, aditz nagusiaren eta menpekoaren subjektuak bat bera direnean aplikatzekoa da. *Etxera joateko pozean nago. Ez daukat mugitzeko itxaropenik. Ez daukat arazo guztiak konpontzeko*

*beldurrik*. Horrela esanda, 'joateko', 'mugitzeko' edo 'konpontzeko' horien subjektuak NI-NIK direla ulertu behar da. Ni nago pozik, ni naiz joatekoa. Subjektuak aldatzen badira, adierazi egin behar da. *Ez daukat inor etortzeko itxaropenik. Ez daukagu haiek agertzeko usterik. Ez daukat zu sendatzeko itxaropenik*. Azken honetan, eta sarritan, esanahia iluntasun arriskutsuan gelditzen da, ez baitago argi zer den: *Ez daukat zu senda zaitzadan itxaropenik* ala *Ez daukat zu senda zaitezen itxaropenik*. Orduan argi dago N forma erabili behar dela, aditza jokatuz: *Senda zaitezen* edo *sendatuko zaren*.

REN: Sarritan genitibo garbia izaten da. *Ondo egitearen ordaina. Sinesten ez dena predikatu behar izatearen kontradikzioa*. Batzuetan, forma hau eta aurrekoa –ZEREN eta ZERTARAKO– argi bereizten dira, eta bereizi behar dira. Ez dira berdin *etxera iristearen poza* eta *etxera iristeko poza*. Lehenengoan, iritsita dago eta horrek damaio poza. Bigarrenean, iristeko dago, baina segurantza edo itxaropen horrek pozten du. Badira kasuak, non ez dagoen argi bata ala bestea den. Edo, soilik, berdintsu da batera zein bestera interpretatzea. Esaterako: *Unibertsoagaz bat eginda bizitzeko poza*, edo *unibertsoagaz bat eginda bizitzearen poza*. Zaila da bereizkuntza, zaila baita norbere burua unibertsotik kanpora irudikatzea, haregaz bat egiteko poza sentitzeko, etxera iristeko bezala. Badago, noski, ñabardura bat, posible baita unibertsoan bizitzea, beragaz moralki bat egin gabe. Baina, normalean, kontestuak ñabardura hori zehazki eskatzen ez badu, esaldi bata zein bestea jaulki duenak gauza berdina esan nahi du.

Orain arteko kasuak ohikoen artean daude, eta solas normalerako nahikoa izan litezke. Euskarak horietan baditu soluzioak, aipatu esperpentoak salbu, hizkuntzaren degradazioak, esatarien zabarkeriak eta kontrolik ezak sortzen dituztenak. Zer gertatzen da, ordea, gure "atzekoz aurrerako sintasi" zorioneko hori inbertitzen denean, behar delako, komeni delako, edo, soilki, halaxe egiteko kapritxo literarioa dugulako? Esaterako: *Ederto bizi naiz pizteko itxaropenagaz*. Baina orain esan nahi dut: *Ederto bizi naiz, itxaropenagaz... ez naizela piztuko!* Bistan da sorpresa gisan, indargarri gisan, edo kapritxo soil gisan, 'ez naizela piztuko' perpaus menpeko hori azkenerako utzi nahi dudala. Ez du balio esan diezadaten: *"Ba, esaik: Ederto bizi naiz, ez naizela piztuko... itxaropenagaz"*. Orduan, itxaropena da markatzen dudana, eta ez zen hori nik nahi nuena. Eta,





gainera, ordena horretan esan beharko zen: *"Ederto bizi naiz, piztuko ez naizen... itxaropenagaz"*. Ez dago zertan eztabaidatu. Sintaxiaren inbertsioak, jarduera literarioan batez ere, oso garrantzitsuak dira, eta euskaraz baliabide funtzionalak eta naturalak behar ditugu, sortzen diren premiak edo gurariak (edo kapritxoak, soilik) betetzeko.

Partikula batek konpon dezake dena. EZEN izan daiteke bera. *"Ederto bizi naiz, itxaropenagaz ezen... ez naizela piztuko!"*. Partikulak argitu, iragarri egiten du ondorengoa. *"Oraindik ere baikortasunean bizi dira ezen noizbait zerbait ikusi ahal izango dutela"*. Egia da, esaldi laburretan, partikula gabe ere balitekeela argitasunik ez galtzea. *"Oraindik ere baikortasunean bizi dira, noizbait zerbait ikusi ahal izango dutela"*. Egia da, baita, esan daitekeela: *"Noizbait zerbait ikusi ahal izateko baikortasunean bizi dira oraindik ere"*. Baina esaldiek oso itxura eta espresio ezberdina dute.

Esaldi laburretan inbertsio premia zorrotzik ez legokeela onarturik ere, arazo nagusia esaldi luzeetan dator. Ez gutxi eurok, solas arruntetik harago, gai baten azalpenetan edo espresio literarioetan sartzen garenean. Hona *Joan ziren* zikloko azken liburuetan idatzi izan ditudan esaldi askotariko bat: *"Atsegintzen dira* (animaliak) *nigan euren kontzientzia sentitzeaz, horrela mirari epikureo gorena lorturik ezen kontzientziaren onura posible guztia baliatzen dutela, bere problema guztiak saihestuz"*. Esaldi honen zailtasun bakarra 'ezen' partikularen funtzioa ez ulertzetik letorke. Gaztelaniazko (eta inguruko beste edozein hizkuntzatako) itzulpen batean, ez legoke inolako ulertezinik: "Se alegran (los animales) de sentir en mí su propia conciencia, consiguiendo así el supremo milagro epicúreo de que aprovechan el beneficio de la conciencia, evitando todos los problemas de la misma". Esaldi hau honelatsu euskaratzen saiatu izan gara orain arte: *"Euren kontzientzia nigan sentitzeaz atsegintzen dira* (animaliak)*, horrela, kontzientziaren problema guztiak saihestuz, bere onura posible guztia baliatzen dutelako mirari epikureo gorena lorturik"*. Gure joskeran 'jatorrago' dirudien esaldi honek oso itxura iluna eta makala dauka bestearen aldean. Arrazoi handi bat da *"bere problema guztiak saihestuz"* perpaus-zatiak azken behar zuela, bere esanahia markatzeko, eta ez, esaldiaren erdian, pasadan bezala eta indar nagusia *"onura posible guztia baliatzen dutelako"* zatiari emanez. Kontrastearen bi elementuak behar ziren azkenerako,

elkarren jarraian eta ordena horretan: *"kontzientziaren onura posible guztia baliatzen dutela, bere problema guztiak saihestuz"*. Efektu hauek guztiak lortzeko, itzultzaileei esaldia zatitzearen soluzioa aholkatu ohi zaie. Baliteke batzuetan nahitaezko izatea, baina, oro har, artaziak soluzio deprimentea dira, egitura funtzional soil bat behar litzatekeen tokian: EZEN partikulak (edo beste batek) aise konpontzen du dena.

Esaldi luzea ez ezik, sarritan, bi esaldi edo gehiago datoz izen baten menpean, eta orduan auzia gehiago konplikatzen da. Bi menpeko, edo menpeko baten azpian beste menpeko bat. Gaztelaniaz, oso ohikoak dira, esaterako, honakoak: *"Era una bajada muy empinada y resbaladiza, con el peligro añadido de que, en caso de ocurrir algún accidente, no había por los alrededores ninguna posibilidad de auxilio"*. Honela itzul daiteke: *"Oso jaitsiera pikoa eta labaina zen, arrisku erantsiagaz ezen, istripuren bat gertatzekotan, inguruetan ez zegoela inolako laguntza modurik"*. Beste adibide bat: *"Vivimos en la permanente contradicción de que, por una parte, queremos y luchamos por una cultura más elevada, y por otra, no podemos dejar de producir más basura cultural"*. Itzulpen posible on bat: *"Halako kontradikzio etengabean bizi gara ezen, alde batetik, nahi dugu (nahi baitugu) eta borrokatzen gara (baikara) kultura jasoagoaren alde, eta bestetik, ezin diogu utzi zabor-kultura gehiago ekoizteari"*. Ez dut pentsatu nahi *"halako kontradikzio etengabean bizi gara"* perpaus-zatia azkenerako utzi nahi duenari nolako lukainka aterako zaion. Itzultzaile arautuek berriz ere artaziak proposatuko dituzte. *"Kontradikzio etengabean bizi gara. Alde batetik, nahi dugu..."*. Ez du merezi eztabaidan xahutzerik. Artazien metodo primarioa aukera bat izan liteke, baina primarioa da, eta hain gabeko beste aukera berdin erraz eta efektiboago bat eskura izanez gero, gutxik joko dute artazietara.

## *Deklinabide-kasuen joskera*

Genitiboa izenaren aurretik joatea arau orokortzat jo da, eta horretan, aurreratua genuena atzeratu egin dugu. Genitiboari ez diogu hiperbatonik onartzen. Atzetik jartzekotan, mugaturik behar du, baina orduan ez da genitibo soila, genitibozko izena baizik. Esaterako: *zure beldurrik ez daukat, baina bai zure mihiarena. Oilo lumak barik, miruarenak*





*dira hauek. Txanogorritxoren ipuina nahi dut, ez otsoarena.* Hauetan ez dago problemarik.

Euskal senaren aurka al dago genitiboa atzera edo komeni den tokira pasatzea? Hona Etxahun Barkoxekoaren *Urzapal bat* sortako ahapaldi bat:

*Traditu zütüdala*
*deitazüt erraiten*
*bata eta bestia*
*gu biak bat ginen.*
*Ene bihotza zaizü*
*bizikoz egonen*
*behar beitzütüt ützi*
*lotsaz etxekuen.*

Azken puntuak, gure gramatiken arabera, *behar beitzutut utzi etxekuen lotsaz* behar luke. *Lotsa* hemen *beldurra* da. Etxahunek bat ere erreparo gabe atzekoz aurreratzen du. Eta har kontuan hura ez dela literaturgile ilustratu bat, bere herkide Oihenart izan zitekeen legez. Koblakari da, aho-hizkera hutsean dabilena. Haren bertsoak herriak buruz zekizkien, hauxe izan baita Euskal Herrian, bat izatekotan, genero herrikoi bat. Eta, gainera, ahapaldiaren azken puntuan, oinean bertan, sartzen du lizentzia. Horrek esan nahi du berak ez duela lizentziatzat hartzen, joskera naturaltzat baizik. Horrelako adibideak erruz eman litezke. Zergatik gaitzetsi da herriak hain normal beregandua zeukan aurrerapen bat? Etxahunek hain naturalki eman eta Iparralde guztiak berdin kantatu zuen forma zergatik ez dugu guk onez baliatuko? Beraz, nik lasai erabili izan ditut, eta erabiliko ditut, honelakoak: *Ez nator ezeren bila, are gutxiago, hilerriko bakearen, horretarako biziak behar baitira. Noren onerako bizi behar dut, ez bada neure buruaren?* Edo kanta dezaket: *Alde nago bakearen, ez makurmenaren, ez bada sadismoarren.* Azken hau bi R-z, hots: *sadismoarren = sadismoagatik*.

Gorago emandako esaldi bat honela ere has daiteke: *ez naiz zure beldur, zure mihiaren...* Zer egin? Gehienean, esamoldea aldatzen edo hitza errepikatzen dugu: *Ez naiz zure beldur, zure mihiaren beldur baizik.* Eta zergatik ez: *ez naiz zure beldur, zure mihiaren baizik?* Ez litzateke lehenengoa. Elipsi hori euskararen tradizioan egon badago, baina baztertua

izan da. Eta, oharkabean, hizkuntzaren aurrerapen handi bat baztertu da. Jar ditzagun adibideak:

*Euskara, zenbait egituratan, ingelesaren kideago da gaztelaniaren baino. Barka, baina zeure bila nator, ez zure diruaren. Ez naiz heriotzaren beldur, bizitzaren baizik. Hori lanaren bitartez lortzen da, ez zortearen. Denaren gose naiz, Jainkoaren, deabruaren eta bitarteko zernahiren.*

Gaur, gehienok lehenengo esaldia honela moldatuko genuke: *Euskarak, zenbait egituratan, ingelesarekin kidetasun handiagoa dauka gaztelaniarekin baino.* Gaizki dagoenik ez dut esango, baina atzerapen handia dela bai. Luze-laburrean bakarrik, *ingelesaren kideago da gaztelaniaren baino* perpausak hamazortzi silaba dauzka. Besteak, berriz, *ingelesarekin... baino*, hogeita sei. Besteetan ere, aldatu edo hitza errepikatuko genuke: *ez naiz heriotzaren beldur, bizitzaren beldur baizik.* Efektu oratorioren bat lortzeko ez bada, hizkuntza aurreratua ez da errepika zale. Horretarako dago, besteak beste, elipsia. Azken esaldia: *denaren gose naiz, Jainkoaren, deabruaren eta bitarteko zernahiren gose* egin liteke, noski, baina bigarren 'gose' horrek dena desorekatzen du, berari ez dagokion garrantzia hartzen eta dagokionari kentzen baitio.

Batzuetan, esankortasunak justifika dezake baliabidea. *Makinaren hutsa izan da, ez makinistarena. Haurra bien ume da, ez bakarrik amarena.* Hauek ondo daude, eta normalean, honelaxe behar dute. Baina gaizki al leudeke artikulu gabe, honela airean? *Makinaren hutsa izan da, ez makinistaren. Haurra bien ume da, ez bakarrik amaren.* Esamolde hauei aldakuntza ezerez batek oso espresio ezberdina eman die. Hori, batez ere, esaldi luzeago eta konplexuagoetan gertatzen da. Esaterako:

– *Baina asmoa da kontzientzia har dezan historiaren benetako zentzuaren. Bere eginkizun argitzailearen.*

Esaldi hauek era askotara antola daitezke. Esaterako: *Baina asmoa historiaren benetako zentzuaren kontzientzia har dezan da. Bere eginkizun argitzailearena.* Soluzioa zuzena da, baina literarioki desegokia, 'historiaren benetako zentzuaren' eta 'bere eginkizun argitzailearena' elkarrengandik urrunegi eta eraikuntza ezberdinean gelditu dira. Dena delakoagatik,





biak azken eta jarraian ipini nahi izanez gero (eta horretarako arrazoi literarioak, batzuetan, ebidenteak dira), orain arteko era 'zuzena' honakoa izan daiteke: *Baina asmoa da kontzientzia har dezan historiaren benetako zentzuarena. Bere eginkizun argitzailearena.* Derrigorra al da artikulu mugatzaile hori? Ez du izan beharrik, eta, neuretzat, hemendik aurrera ez da izango. Gutxienez, aukerakoa.

## *Deklinabide-kasuen izenekiko lotura*

Genitiboa da, bai pertsonala, bai tokizkoa, izenari zuzen loturik doan kasu bakarra: *katuaren bizarrak oso sentikorrak dira. Teilatuko katua parte txarrekoa ei da.* Beste guztietan, aditza da bitarteko. Jar ditzagun adibide batzuk:

NORI: *Lurrari diodan maitasunak biziarazten nau. Gehiengoari izan beharreko obedientzia demokraziaren falazietako bat da.*

NOREKIN: *Egurrarekin egiten den suak xarma gehiago dauka. Besteekin daukagun harremana elkarren tolerantzian datza.*

NORENTZAT: *Historia hori haurrei dagokien ipuina da. Haurrentzat egiten diren jostailuek ez lukete hain agresiboak izan behar.*

NORENGAN: *Jainkoarengan neukan fedeak kementzen ninduen. Norberagan konfidantza edukitzea da garaipenaren oinarri nagusia.*

NORENGANDIK: *Ez egon inorengandik datorkeen soluzioari begira. Zugandik heldu zaidan indarrak salbatu nau.*

NORENGANA: *Zugana daukadan joera aspaldikoa dut. Besteengana duen irekierak definitzen du gizakia.*

NORENGATIK: *Besteengatik daukagun sufrimendua sarritan alferreko da. Familia bategatik izan daitekeen pozak bizitza bat salba dezake.*

NORTAZ: *Nitaz egindako galderei ez erantzun. Zuk ez begiratu zutaz dauden informazioei.*

ZERTAZ: *Hontaz eta hartaz solas egitea beti da lasaigarri. Ez dakit filma zertaz izan zen ere.*

NON-ZERTAN: *Loretan dagoen zuhaitza baino erotikoagorik ez dago. Bere zuloan dagoen piztia bi bider piztia da. Trenez egiten den bidaia begien gozamena da.*

NORA: *Etxera egin genuen itzulera okerragoa izan zen. Txarrera dagoen grina onera dagoena baino indartsuago balitz, munduan ez genuke hainbeste sufrimendu.*

NORANTZ: *Zurperkuntzarantz daraman bidea hasia dela dirudi. Beti ostertz berrietarantz zeukan begirada hark hil arte jarraitu zion.*

NONDIK: *Teilatutik egiteko jaitsiera jauzian egin zuen. Tximinotik daukadan jatorria ohore zait.*

Aditzak –gehienean, aditz erlatiboak- markatzen duen erlazio hori gure inguruko hizkuntza aurreratuek erabat eliditzen dute, zerbaitegatik osorik esatea komeni ez denean. Hona gaztelaniazko adibide batzuk, non *la cola del gato* edo *el gato del tejado* bezain naturalak diren *el amor a los gatos debe ser... la relación con el gato debe ser... la pasión por el gato debe ser... un gato en celo puede... el camino hacia el éxito siempre tiene...* eta abar. Horren arabera, arestiko adibide zerrenda honelatsu itzuliko litzateke gaztelaniara:

*El amor a la tierra me da vida. La obediencia a la mayoría es una de las falacias de la democracia. La relación con los demás se basa en la tolerancia. Los juguetes para niños no deberían ser tan agresivos. Me animaba mi fe en Dios. La confianza en sí mismo es la base principal del éxito. Mi inclinación hacia ti es antigua. No esperes soluciones de los demás. Me ha salvado la fuerza que me llega de ti. La persona se define por su apertura a los demás. A menudo el sufrimiento por los demás resulta inútil. No respondas a preguntas sobre mí. Una conversación sobre esto y lo otro siempre tranquiliza. La ilusión por una familia puede salvar una vida. Nada hay más erótico que un árbol en flor. El viaje en tren es un placer para la vista. Nuestra vuelta a casa fue peor. Si la tendencia al bien fuese más fuerte que la tendencia al mal,*





*no habría en el mundo tanto sufrimiento. Parece que ya comenzó el camino hacia la recuperación. Aquella mirada continua hacia nuevos horizontes le siguió hasta la muerte. La bajada desde el tejado la hizo saltando. Mi ascendencia del mono es para mí un honor.*

Orain, erdal esaldiok zuzen euskaratzekotan, zer gertatuko da? Izenak aditz-izen bihurtuz gero, ez dago problemarik. *Lurra maitatzeak biziarazten nau. Gehiengoari obeditzea demokraziaren falazietako bat da. Besteekin harremantzea tolerantzian datza. Jainkoarengan sinesteak kementzen ninduen. Norberagan fidatzea da garaipenaren oinarri nagusia. Zugana jotzea aspaldikoa dut. Ez egon inork soluzionatzeko begira. Besteengana irekitzeak definitzen du gizakia. Sarritan, besteengatik sufritzea alferreko da. Nitaz egiten dizkizuten galderei ez erantzun. Hontaz eta hartaz solas egitea beti da lasaigarri. Trenez bidaiatzea begien gozamena da. Etxera itzultzea okerragoa izan zen. Beti ostertz berrietarantz begiratzeak hil arte jarraitu zion. Teilatutik jaistea jauzian egin zuen. Tximinotik etortzea ohore zait.*

Esaldi batzuk saltatu egin ditut, aditz-izenen formara ekartzea zaila edo ezinezkoa baitzen. Baina daitekeenean ere, izenak beti aditz-izen bihurtzen ibiltzea ez da erremedioa. *Begirada* eta *begiratzea* edo *obedientzia* eta *obeditzea* ez dira berdinak. Eta, sarritan, nahikoa urruntzen dira, *jatorria* eta *etortzea* bezala.

Euskarak lotura hori deklinabidearen bidez egiten du, KO atzizkiaren bitartez, alegia, egiten duenean: *norekin-norekiko, norentzat-norentzako, norengandik-norengandiko, norengana-norenganako, norengatik-norengatiko, nortaz-nortazko, zertaz-zertazko, nora-norako, norantz-noranzko, nondik-nondiko.* Hauetan ere, denak ez dira berdin garatu.

NOREKIN-NOREKIKO: *Norekiko* formari beste kutsu bat eman zaio, gaztelaniazko *en relación a, con respecto a,* edo horrelako zerbait. *Zurekiko itxaropena galdua dut* litzateke zutaz, zuregan edo zurekin neukan itxaropena galdua dudala. *Zurekiko,* hutsean, zuri dagokizunez, zuri buruz litzateke. *Nirekiko* niri dagokidanez, baita ni baitan, nire gogoaren barnean. Hala ere, gaztelaniazko CON adierazteko balio du, edo balio behar du, hortixe baitator. *Gurasoekiko tratua-el trato con los padres, enpresarekiko erlazioa-la relación con la empresa.* Jarritako adibidean, *egurrarekiko sua*

ez legoke ondo, *egurrezko sua* baizik. Baina beste kasu batzuetan, ondo egon liteke. Gaztelaniaz, adibidez: *primero irán los vagones con leña, a continuación lo vagones con ganado.* Euskaraz ez legoke gaizki: *lehenen egurrarekiko bagoiak joango dira, ondoren ganaduarekikoak,* nahiz eta *egur bagoiak* edo *egurdun bagoiak* hobeto egon.

KINen sinonimo den bizkaierazko GAZ-KAZ, beharbada, gehiago erabili da era horretan. *Zugazko ibilerak, zuekazko tratua, umiekazko jolasa, maisuagazko orduak...* oso naturalak dira euskalki horretan.

NORENTZAT-NORENTZAKO: Hauekin sortu den problema da erabilerak sinonimotzat berdindu dituela. Gehienen ahoan, *niretzat* zein *niretzako, denentzat* zein *denentzako* berdinak dira. Hala ere, bigarrenak lehenengoaren lotura egiteko balio du. Denentzat + KO = denentzako: *Besteentzako lanak denbora gehiegi jaten dit.* Hau gaztelaniaz *el trabajo para los demás* litzateke.

NORENGANDIK-NORENGANDIKO, NORENGANA-NORENGANAKO, NORENGATIK-NORENGATIKO

Hauetan ez dago problemarik. *Ez egon inorengandiko soluzioari begira. Zugandiko indarrak salbatu nau. Zuganako joera aspaldikoa dut. Besteenganako irekierak definitzen du gizakia. Besteengatiko sufrimendua sarritan alferreko da. Familia bategatiko pozak bizitza bat salba dezake.*

NORTAZ-NORTAZKO, ZERTAZ-ZERTAZKO

Hauetan ere ez dago problemarik. *Nitazko galderei ez erantzun. Hontaz eta hartazko solasa beti da lasaigarri.* Z atzizki soilari KO eransteak ekibokoa sor dezake. *'Gerraz',* adibidez, gerrari buruz bada, 'gerrazko filma' izan daiteke, gerrari buruzko filma. Baina baita gerra-filma ere, hots, gerraz beteriko filma. Gaztelaniaz, 'película de guerra' eta 'película sobre la guerra'. Ekibokoa *buruz* partikulak hausten du. *Gerrari buruzko filma* eta *gerrazko filma* edo *gerra-filma.*





NORA-NORAKO, NORANTZ-NORANZKO, NONDIK-NONDIKO

Hauetan ere ez dago problemarik. *Etxerako itzulera okerragoa izan zen. Txarrerako grina onerakoa baino...* Hemen loturazko atzizkia ezabatzea ere normala da, *bide*-rekin behintzat: *etxera bidea, museora bidean... Zuzperkuntzaranzko bidea hasia dela dirudi. Beti ostertz berrietaranzko begirada hark hil arte jarraitu zion. Teilatutiko jaitsiera jauzian egin zuen. Tximinotiko jatorria ohore zait.*

Beste kontu bat da forma hauek denak berdin erabiliak edo arruntak diren. Ez datoz, noski, denak berdin belarrira. Baina denak dira familia berekoak eta beharrezkoak.

NORI: Kasu batzuk badaude, lotura hori onartzen ez dutenak. Nabariena datiboa da. Erdaretako *el amor a la tierra, la entrega a los demás, el sometimiento al jefe...* ezin ditugu zuzenean esan. Edo izena aditz-izen bihurtzen dugu, gorago esan bezala (*lurra maitatzeak, besteei entregatzea, buruzagiari makurtzea*), edo beste saihesbide batzuetara jotzen dugu: *lurraren maitasunak, lur-maitasunak, besteekiko entreguak, besteenganako entreguak, buruzagiarenganako makurmena...* Genitiboa, batzuetan, ondo dator. *Lurraren maitasuna* lurrari zaion maitasuna ulertzen da, suposatzen baita lurra ez dela maitasunaren subjektu, normalean, behintzat. Baina *'zure maitasunak eusten dit'* zer litzateke, nik zuri dizudana ala zuk niri didazuna, biok baikara maitatzaile posibleak? Normalean, zuk didazuna ulertu behar da, zure maitasuna, zuk daukazuna.

Demagun film bat azaltzen ari zaizkigula erdaraz: *En esta secuencia se narra el ataque a los indios. En ésta, en cambio, se resume el ataque de los indios.* Biak ezingo ditugu *'indioen erasoa'* itzuli, ezta? Edo: *¿Leíste en el periódico las preguntas de Aresti?* Baina baita izan daiteke: *¿Leíste en el periódico las preguntas a Aresti?* Nahiz eta, batzuetan, kontestuaren laguntzaz, datibo bat adierazteko genitiboa ondo etorri, argi dago oso ildo ezberdinak eta trukagaitzak direla.

NORENGAN: Hau ere, sarritan, genitiboz konpondu ohi da. *La fé en Dios = Jainkoaren fedea; confianza en el porvenir = etorkizunaren konfiantza.* Suposatzen da Jainkoa ez dela fedearen subjektu, eta etorkizuna ez

dela konfiantzaren edukitzaile. Baina '*gurasoen konfiantzak salbatu nau*' badiot, konfiantza hori gurasoek daukatena da, nigan edo zerbaitetan, eta nik haiengan daukadana. Hala ere, kasu honek nahiko naturalki onartzen du GO lotura, argitasuna segurtatu nahi denean: *Jainkoagango fedea, gurasoengango konfiantza, gazteengango itxaropena.* Baina kargatu samar gelditzen da.

NON: Hau, sarritan, tokizko genitiboak ondo adierazten du: *kaleko bizimodua = la vida en la calle. Etxeko bakea gauza ederra = cosa bella es la paz en la casa.* Hemen bi formak, sarritan, erdi sinonimoak izatean dago gakoa. Erdaraz ere, *el ambiente de la calle* eta *el ambiente en la calle*, *las estrellas del cielo* eta *las estrellas en el cielo* antzekoak dira. Genitiboa erantsita doan izenarena dela ulertzeko arriskurik ez dagoenean, ez dago problemarik. Kasu hauetan, suposatzen da giroaren sortzailea ez dela kalea, eta izarrak ez direla zeruarenak.

Beste batzuetan, euskararen hitz-elkartze egitura egoki dator. Gaztelaniaz, adibidez: *el viaje en avión es más rápido, mientras que el viaje en tren resulta mucho más vistoso.* Euskaraz: *hegazkin-bidaia azkarrago da, baina tren-bidaia askoz ikusgarriago.* Edo: *hegazkinezko bidaia azkarrago da, baina trenezkoa askoz ikusgarriago.* Aditz-izenera ere jo liteke noski: *hegazkinean bidaiatzea...trenean bidaiatzea,* baina hori sistematikoki egitea konponbide kaxkarra dela esana dugu. Eta askoz kazkarragoa, *hegazkinean bidaiak egitea* eta gisako luzapideak.

NON kasua nahitaez markatu beharreko lotura dagoenean (beraz, ez dute balio *etxeKO, zeruKO* eta gisakoek), loturazko atzizkia eranstea proposatu izan da. Horrela, esaterako, gauza bat litzateke *etxeko lana* edo *etxe-lana*, etxeak ematen duen lana; eta beste bat, *etxeango lana* edo etxean egiten den lana, batzuek zortetzat daukaguna. Berdin *kanpoko lana* eta *kanpoango lana.* Ondo iruditzen zait, eta ez dakit forma honek zergatik ez daukan arrakasta handiagorik.

ZERTAN: *Non* kasuaren antzekoa. *Lan orduak, laneko orduak, dantza garaia, dantzako denbora...* badakigu zer diren. Lanean, dantzan... egiten diren orduak, erabiltzen den denbora. Gaztelaniaz ere, *horas de trabajo, tiempo de baile.* Izan ote liteke '*laneango*' bezalako formak behar izaterik?





Demagun arte erakusketa batean gaudela. Koadro erdi abstraktu bati erreparatu diogu, eta ulertzaile on gehienak bezala, berehala goaz azpiko titulura, non jartzen duen: *Hombre trabajando.* Sarreran eman diguten liburuxkan koadro horretaz zer dioen bilatzen dugu: '*Hombre trabajando' no es una simple escena visual, sino más bien un concepto intelectual. El 'hombre trabajando' no es un hombre cualquiera. Al 'hombre trabajando' los miembros se le convierten en herramientas. Por eso el artista...*

Titulua *Gizakia lanean* litzateke. Baina argi dago gero bi hitzek unitate bat osatzen dutela, kontzeptu bat, hain zuzen. Orduan, hitz bakarra bezala dira, *laneanaridengizakia* bailitzan. Gainera, deklinatu egin behar da, eta deklinagai bakarra gizakia da. Bestea honen mende dago, eta bere kasuari eutsi behar dio. Baina, horretarako, ordena aldatu behar. *Lanean-ariden-gizakia*-ri erdikoa jaten diogu, eta *lanean-gizakia* geratzen da. Lotura egiten dugu, eta *laneango gizakia* ateratzen. Eta itzul genezake: '*Gizakia lanean' ez da eszena bisual soila, kontzeptu intelektuala baizik. 'Laneango gizakia' ez da nolanahiko gizakia. 'Laneango gizakiari' gorputz-atalak erreminta bihurtu zaizkio. Horregatik, artistak...*

Bi hitzen kontzeptu bakartze hori, dena osorik esanda lor daitekeela esan dugu, *laneanaridengizakia* eginez. Beraz, itzul genezakeen '*Gizakia lanean' ez da... Lanean ari den gizakia ez da nolanahiko gizakia. Lanean ari den gizakia-ri gorputz-atalak...* Genezakeen, baina abstrahitzen hasita, elementu guztiak esplizitatzea ez da kontzeptugintza aurreratua. Laburtzea espazio kontua ez ezik (hori ere garrantzitsua, noski), kondentsazio intelektuala ere bada.

Esanak esan, NORI geratzen zaigu, beste izen batekin loturarik jasaten ez duen kasua, eta NORENGAN, NON eta ZERTAN, nekez jasaten dutenak. Etsi egingo al dugu, zeharbide sasitsuetara joz? Inola ere ez. Euskarak hitz elkarkuntzan nahiko abstrakzio maila erakutsia du, hauek eta gehiago asimilatzeko. Sarritan, gainera, beste hizkuntzek baino ausardia handiagoa darabil elementuak ezabatzen. Ez da derrigorra loturazko hizkiren bat. *Haurraren zentzuna* bezala, zergatik ez *haurrari maitasuna, haurrengan fedea, trenean bidaia, lanean gizakia*? Alderantziz ere esan daitezke, noski: *maitasuna haurrari, fedea haurrengan, etxean lana, gizakia lanean.* Baina, alde batetik, deklinabideak bere ordena eskatzen du, eta

bestetik, eta batez ere, hitz elkartuen egituran sartzen gara, non hitz menpekoak aurretik behar duen, *haur-maitasuna, haur-fedea, etxe-lana, lan-gizakia* bezala. Egitura bera, baina oso esanahi ezberdina. Eta elkarren dependentzia hori ez dagoela argi uste bada, jar lotura ikurra beldur gabe: *haurrari-maitasuna, etxean-lana, lanean-gizakia.*

Eta loturazko KO onartzen dutenetan, zubi hori ezabatuko bagenu? Adibidez: *gurasoekin tratuak eskola orduak baino gehiago nekatzen du. Zuri ez dizu besteentzat lanak denbora gehiegi jango. Ez egon inorengandik soluzioen zain. Besteengana irekierak definitzen du gizakia. Besteengatik sufrimendua sarritan alferrekoa da. Etxera itzulera okerragoa izan zen. Gorantz begiradak laguntzen dit zoru ustel hau gainditzen. Tximinotik jatorria ohore zait.*

Forma hauen asimilatzeak jaregintasun handia dakarke, beti KO atzizkiaren menpe egon gabe. Eta orduan, atzizki horrek errepikak ekiditeko modua lemaiguke: *Gurasoekin tratuak gehiago nekatzen du haurrekikoak baino. Ni ez nau besteentzat lanak arduratzen, alferrentzakoak baizik. Inorengandik soluzioen zain dagoenak norberagandikoak galtzen ditu. Lagunengatik sufrimendua sarritan alferrekoa bada, pentsa zer izango den etsaiengatikoa. Tximinotik jatorria duinagoa da saihets batetikoa baino.* Bigarren KO honek bi lan batera betetzen ditu. Bata lotura edo zubi lana (*gurasoekiKO tratua*), eta bestea ezabatutako hitzaren ordezkotza. Gaztelaniaz ez dut uste errepikatik libratzeko modu egokirik denik.

Egia da bietan KO jartzea badagoena: *gurasoekiko tratuak gehiago nekatzen nau haurrekikoak baino.* Hori jakintzat ematen dut. Esan nahi dudana da lotura horretatik ere askatzen hastea aurrerapentzat jotzen dudala. Eta zer esanik ere ez, KOrik onartzen ez duten kasuetan. Egitura arrotza dela-eta, belarriren bat minduko balitz, motibo gutxiagoko maileguetara makurtu garela esango nuke. Gure aldameneko hizkuntzek hain natural egiten dituzten lasterbideak saihesteagatik, ez gara beti zeharbide gakotsuetan sartuta ibiliko. Horrek ere belarria mintzen du.





## *Datiboarekiko lotura*

Deklinabidetik harako loturetan, genitiboa eta datiboa dira ondorengo izen bategaz loturarik onartzen ez duten bakarrak. Genitiboaren kasuan, behar ere ez du, bera baita, definizioz, lotura. *Munduaren sorrera, eguzkiaren distira.* Beste kasu guztietan, GO-KO atzizkiaz baliatzen gara lotura egiteko: *Amaganako debozioa, aitagazko-aitarekiko harremana, besteentzako borondatea, lagunengandiko berriak, etxeko lanak, etxerako gogoa, menditiko itzulera, goranzko joera, lerroango aparkamendua...*

Azken hau ez da oso ohikoa, ez baita maiz erabiltzen, baina existitzen da, eta oso praktikoa eta gehiago baliatu beharrekoa da. Sarritan, esanahi hori KO atzizkiak eman lezake. *Mendiko bizitza* 'mendian egiten den bizitza' dela ulertzen da, baina, adibidez, gaztelaniazko 'suspensión en el aire', 'bajada en marcha', 'vida en guerra', 'vida en paz' ez dira esplikatzen atzizki horregaz. Badakit esan daitekeela: *airean gertatzen den suspentsioa, martxan egiten den jaitsiera, gerran egiten den bizimodua, bakean egiten den bizitza.* Forma hauek luzeak eta primarioak dira. Labur daitezke honela: *airezko suspentsioa, martxako jaitsiera, gerrako bizimodua, bakezko bizimodua.* Baina kontzeptuaren zehaztasunetik aldentzen ari gara. Ez dira berdinak, kontestu guztietan behintzat, 'gerrako bizimodua' eta 'gerrango bizimodua', edo 'bakezko bizimodua' eta 'bakeango bizimodua', gaztelaniaz ere ez liratekeen bezala 'el amor en la guerra' eta 'el amor en guerra'.

Hari xumezko eztabaidan gal gintezke, baina zergatik ez, duda guztiak uxatzeko, lotura argia egiten duten formak lasai onartu? Honela: *Ez da berdina aireango suspentsioa eta suspentsio eskegia* (ez horixe!), *martxango jaitsiera, gerrango bizimodua, bakeango bizimodua, bakarreango bizitza, sufrimenduango plazera.* Hona, adibidez, esaldi posible bat: "*Zail da sinestea, baina egia da batzuek sufrimenduan aurkitzen dutela plazera, baina sufrimenduan aurkitzen den plazerak, luzera, sufrimendua areagotuko du".* Zilegi da, noski, bigarren partea, gaztelaniak (eta inguruko hizkuntzek) 'el placer en el sufrimiento' gisan laburtzen duena, errepika nekagarri horregaz adieraztea. Laburtzen hastekotan, 'sufrimenduan' eta 'plazera' lotu behar ditugu. Nola? '*Sufrimenduzko, sufrimenduko, sufrimenduaren... plazera'?* Ez da hori esan nahi duguna. Zergatik ez, beste gabe eta zuzen: "*... baina sufrimenduango plazerak, luzera, sufrimendua areagotuko du"?*

Hertsiki beharrezko ez dela emanik ere, baliabide natural bat gehiago edukitzeak inori ez dio kalterik egiten. Niri ez, behintzat.

NON kasuan baliabide hori aplika badezakegu, NORI kasuan ez daukagu lotura zuzenik egiteko modurik. Honi ezin diogu, orain artekoari jarraituz behintzat, KO atzizkiaren loturarik erantsi. Hona gaztelaniazko adibide ugarietako batzuk: *Respeto a los padres, devoción a la Virgen, la entrega a los demás, visita a los abuelos, servicio al cliente, agradecimiento al público...* Sarritan, kontestutik suposatzen da genitiboak (*'gurasoen errespetua, Ama Birjinaren debozioa, bezeroaren zerbitzua'*) horixe adierazten duela. Baina suposatu egin behar da, eta kontestuaren laguntzaz. Kasu batzuetan, genitibo hertsiak ez luke zentzurik, debozioa ez baita Ama Birjinaren propietate bat, berari zaiona baizik. 'Jainkoaren fedea' ere Jainkoari zaion edo Jainkoarengan den fedea izan behar du, Jainkoak ezin baitu berak federik izan. Baina gurasoek bai izan dezakete eurek ere errespetua, edo bezeroak zerbitzua, edo publikoak esker ona.

Badago modu bat auzia argitzen duena: *Gurasoenganako errespetua, entzuleenganako esker ona, lagun hurkoaganako entregua.* Baliabide hau ezin da, ordea, kontzeptu guztiekin aplikatu. Zentzugabea litzateke: *Aitita-amamenganako bisita, gusaroenganako deia.* Norbaitek badio "*aitita-amamen bisitak kezkaturik nauka*" edo "*gurasoen deiak kezkatzen nau*", ulertu behar da aitita-amamek berari egingo dioten bisitak kezkatzen duela. Edo gurasoek egin dioten edo egingo dioten deiak. Egilea bera bada, esan beharko du: "*aitita-amamei egin behar diedan bisitak kezkaturik nauka*" edo "*gurasoei egiteko naizen deiak kezkatzen nau*". Hori guztia esan behar al da datibo soil bat adierazteko? Zergatik ez, genitiboaren kasuan bezala, lotura zuzen egin: "*aitita-amamei bisitak kezkaturik nauka*" edo "*gurasoei deiak kezkatzen nau*"? Baietz uste dut, eta ezezkoan dagoenak segi beza bere seta nekagarrian.

## *Baizik*

Perpausa batean ezeztatu den elementu baten ordez, hurrengoari baiezko balioa damaion partikula honi zergatik ez hedadura zabaldu, simetria hertsian doazen elementuak ez ezik, bi perpaus oso eta egitura





ezberdineko ere lotuz? Esaterako:

*Errebeldeek, atzorik kuartelean itxita daudenek, ez diote gobernuaren mehatxuei entzungor egin bakarrik, baizik ordezkaritza bat bidali dute Nazio Batuetara, euren exigentziak onarrarazteko baldintzak jarriz.*

Arau tradizionaletan, esaldia honela josi beharko litzateke, gutxi gorabehera: *Ez da errebeldeek, atzorik kuartelean itxita daudenek, ez diotela gobernuaren mehatxuei entzungor egin bakarrik, baizik ordezkaritza bat bidali dutela Nazio Batuetara, euren exigentziak onarrarazteko baldintzak jarriz.* Zergatik egin behar da egokitzapen hori, 'baizik' partikulak zuzenean adieraz badezake kontratasuna? Elhuyar hiztegi entziklopedikoak onartzen du antzeko erabilera bat, adibide hau jartzean: *Ez gaitzazu utz tentazioan erortzen, baizik libra gaitzazu gaitzetik.* Laburragoan, aplikazio berditsua da. Behar dena da aplikazioa sistematikoki erabili ahal izateko lasaitasuna.

Beste adibide batzuk: *Krisia ez da hutsean etortzen, baizik gaitz kolateral asko ekarri ohi ditu. Harreman onak ez du betiko izan beharrik, baizik, batzuetan, astebete irautea ere eskergarri da. Nirea ez da bakarrik bizitze soila, baizik horrelaxe bizi naiz gusturen. Ez da zurekin eztabaitzeko gogorik ez dudala bakarrik, baizik eskertuko nizuke bistatik alde egingo bazenu.*

## *Zertatik zertara, aditz jokatuekin*

Argi dago aditzak ere, forma batzuetan, deklinagarri direla. Esaterako: *Badago aldea babestuak izatetik itoak izatera. Babestetik itotzera. Babestearen, babestean, babesterako, babesten gaituztenera,* eta abar. Horiek denak, subjektuekin eta konplementuekin arazorik edo bereizi beharrik ez denean. Baina, esaterako, erdaraz badio: *Hay diferencia de que nos protejan a que nos atosiguen.* Orduan ezin dugu esan: *Badago aldea babestuak izatetik itoak izatera.* 'Haiek gu' zehaztea falta da. Esan daiteke: *Badago aldea haiek gu babestetik haiek gu itotzera.* Bigarren 'haiek gu' hori ezaba daiteke, subjektuak eta objektuak berdinak baitira.

Nola ezaba daiteke lehenengo 'haiek gu' derrigorrezko hori, zerbaitegatik hala nahi izanez gero? Aditz laguntzaile jokatuagaz: *Badago*

*aldea babes gaitzatenetik ito gaitzatenera*. Edo, soilik: *Badago aldea babes gaitzatenetik itotzera*. Suposatzen da 'itotze' horren subjektuak eta objektuak berdin dirautela. 'Gaitzatenetik' eta 'gaitzatenera' formei kutsu tenporala hartzeak ulerkuntza zail dezake, baina ez dauka eragozpen gaindiezina izan beharrik. Beste zailtasun bat da aditzaren joko subjuntibo horretara ohiturik ez egotea, baina hori ez da hizkuntzaren baliabide-arazoa, hiztunaren murriztasun-arazoa baizik.

Erdaretan, sarritan, "el hecho de que" esamoldea ageri da. Esaterako: *El hecho de que hayas pagado lo que se te pedía no significa que tengas derecho a cualquier cosa*. Honela adieraz liteke, batere arazo gabe: *Eskatzen zitzaizuna ordaindu izanak ez du esan nahi edeozertarako eskubidea daukazunik*. Sarritan, baliabide nahikoa da, baina ez du denerako balio. Esaterako: *El hecho de que nos encontrase reunidos no significa que estuviésemos conspirando*. Era bat: *Hark gu bildurik aurkitu izanak ez du esan nahi konspiratzen ari ginenik*. Berriz ere, 'hark gu' espliziteegi hori ezabatu nahi izateak lekarzke arazoak. *Bildurik aurki gintzanak ez du esan nahi konspiratzen ari ginenik*. Esaldi horretan, 'aurki gintzanak' formak "el que nos encontrase" esan nahiko luke, eta ez "el hecho de que nos encontrase". Orduan, ZER partikula izan daiteke soluzioa, dagokion moduan deklinaturik: *Bildurik aurki gintzan ZERAK ez du esan nahi konspiratzen ari ginenik*. Berriz ere, 'gintzan' forma subjuntiboa arrotz samar egiten zaigulakoak (edo "egiten zaigun zerak"; oraingoan, adibidea esanahiak berak ekarri du) ez du aditza kuestionatu behar, hiztunaren makaltasuna baizik. Beste adibide bat: *Erromatarrek zuzenbidea finkatu zuten ZERAK (finkatu zuteLAKOAK) ez du esan nahi arrazoia asmatu zutenik*. Deklinabidea beste kasu batera aldaturik: *Dena oinarritzen da hirulau aztarna dudazko aurkitu zituzten ZEREAN. Zituztelako ZEREAN*. ('En el hecho de que'). Kasu honetan, ezingo litzateke 'zituztelakoan' hutsik utzi, beste esanahi bat hartuko bailuke.

## Konparazio berdintzailea

Antzeko zerbait gertatzen da *bezalako, moduko, antzeko, gisako*... loturekin sortzen diren konparazio berdintzaileetan. Esaldi laburretan, ez dago arazorik. *Zuhaitzak neguan bezalako janzkera zeraman. Umea kaka*





*egiten bezalako naturaltasunez makurtzen zen edonon*. Arazoa esaldiak luzatzen eta konplikatzen direnean dator. Batetik argitasunak eta bestetik elementuen espresioak esaldiaren inbertsioa eska dezake.

Berriz ere neure *Olatu bat kuartelen gainetik* liburuko aipu bat emango dut. Lehen partea ez da literala, baina bigarrena bai. "*Euren traineru suharragaz irabazitako banderari muin ematen zioten, naturaltasun berdinez nola tu egiten zioten alde batean Franco eta bestean Hilen Harana zekartzan txanponari*". Honela ere idatz zitekeen, noski: "*Euren traineru suharragaz irabazitako banderari muin ematen zioten, alde batean Franco eta bestean Hilen Harana zekartzan txanponari tu egiten zioten bezalako naturaltasunez*".

Idatz zitekeen, baina esaldiaren espresioa asko aldatzen da, 'Franco' eta 'Hilen Harana' azkenerako nahi bainituen, "*tu egiten zioten*" baieztapen gogorrak piztutako espektazioaren atzetik. Baita idatz zitekeen beste era honetan ere, aditz nagusia azken kokatzeko jite altubetarrari jarraituz: "*Alde batean Franco eta bestean Hilen Harana zekartzan txanponari tu egiten zioten bezalako naturaltasunez, euren traineru suharragaz irabazitako banderari muin ematen zioten*". Esan beharrik ez dago esaldi honek guztiz aldatzen duela konparazio originalaren asmo espresiboa, non baieztapen bat konparazio bortitz eta esanguratsu batekin indartu nahi zen. Konparazioa aurretik jartzen baduzu, indar guztia kentzen diozu, obserbazio arrunt baten mailara jaitsiz.

## Beheranzko graduatzaileak

Graduatzaileak goranzkoak zein beheranzkoak dira. Gure inguruko erdarek, gaztelaniak behintzat, bietan mailaketa berdintsua egiten dute: *bastante, más, el más, muy. Poco, menos, el menos, muy poco. Bastante bello, más bello, el más bello, muy bello. Poco bello, menos bello, el menos bello, muy poco bello*, eta abar.

Euskarak goranzkoetan ez dauka arazorik: *nahiko-aski on, hobea, onena, oso ona; nahiko eder, ederragoa, ederrena, oso ederra*, eta abar. Aldea dago euskarak, goranzkoetan, konparatiboa eta superlatiboa ez

dituela adberbio bidez moldatzen (*gehiago-gehien*), atziki bidez baizik: *ago-en*. Baina beheranzkoen atzizkirik ez daukanez, airean uzten gaitu. Eta goranzkoetan onartzen zituen adberbioen (*nahiko-aski, oso-biziki*) alderantzizkorik ere ez du beherantz onartzen. Alegia, ez zaio onartzen utzi nahi izan, hizkuntzak berak ez baitauka nahimenik, hiztunek baizik. Euskaraz, beheranzko graduatzailerik ez dagoela esaten dugu, eta hortik aurrera, bakoitzak ahal duena. Alegia, itzulinguruen labirinto araugabe bat.

Baina graduatzaileak, goranzkoak zein beheranzkoak, kontzeptu simetrikoak dira, biak berdin existenteak eta errealak, bakoitza bere norabidean. Euskarak egitura hori ez daukala esateak ez gaitu kontzeptutik libratzen. Soluzio bat antonimoak erabiltzea izan da. *Menos bonito-el menos bonito* zuzenki esaterik ez dagoenez, *itsusiago-itsusien* esango dugu.

Joera hori ez da inolako soluzio. Alde batetik, hitzik gehienek ez daukate antonimo zehatzik, eta edukita ere, antonimoa ez da beste hitzaren alderantzia. Kualitateen gama batean, *polit-itsusi* muturrak direla esan dezakegu, eta superlatiboan, *politen-itsusien,* muturrenak. Baina polita ez da inola ere itsusiaren alderantzia, konkaboa eta konbexoa izan litezkeen antzera. Demagun bi koadro ezin ederragoren aurrez gaudela. Bat saritu behar, eta ezin erabaki. Azkenean, erabaki dugu. Saritu gabe gelditu den koadroa haserretzen da eta dio:

- *Ez al zenioten, ba, oso-oso-oso ederra nintzela?*
- *Bai* -erantzuten diogu-. *Oso-oso-oso ederra zara, baina bestea baino itsusiagoa (menos bello).*

Hain edertasun handi bat '*itsusi*' adjetiboaren bidez kalifikatzea ez da era egokia. Gustu txarrekoa, duda gabe. Eta simetrien problema latza bistaratu digu, *polit* eta *eder* adjektiboen antonimotzat *itsusi* erabili baitugu. Baina *polit* eta *eder* oso hitz ezberdinak dira, sinonimo samarrak badira ere. Orduan, antonimoa gaizki hautatu dugula eragotz daiteke. Ba al dago, ba, ondo hautatzerik, elkarren alderantzi ez diren hitzetan? Bota dezagun adjektibo horien sinonimo zerrenda bat: *polit, eder, panpox, xotil, ikusgarri, apain, galant, gurbil, bapo, lirain, karan, pinpin, txukun, aratz, arruilo...* Zein da hitz hauetako bakoitzaren antonimoa? Irteera gabeko labirintoan sartuko ginateke. Kualitateek, esan bezala, gama batean, posizio itxuraz





kontrajarria ukan dezakete, eta horretan oinarriturik, antonimotzat jotzen ditugu, baina posizio horiek ez dira inola ere simetrikoak edo bata-bestearen alderantziak.

Kasu batzuetan, atzizki edo aurrizki baten bitartez lortzen da alderantzitasuna: *oxidable-inoxidable, visible-invisible, posible-imposible, oportuno-inoportuno, sano-insano...* Hauetan, IN aurrizkiak kontzeptu bera ukatzen edo alderanzten du. Euskaraz baditugu zenbait atzizki, bata-bestearen alderantzizko efektua lortzen dutenak: *egingarri-egingaitz, entzungarri-entzungaitz, hauskor-hauskaitz, ulergarri-ulergaitz...*

Hortik kanpora, hitzik gehienek ez daukate antonimorik, zeren konparatiboa, adjektiboekin ez ezik, izenekin ere egin daiteke. Zein da *gizon, liburu, ate, horma, ordenagailu, harri, tekla, zenbaki, paper, krisket, bibote* eta abar eta abarren antonimoa? Galdera funsgabea da hau. Eta, hala ere, berdin esan daiteke: *menos hombre que, menos libro que, ahora parece menos pared, menos lobo, cada vez es menos presidente y más marioneta,* eta abar.

Bi baliabide proposatzen ditut. Bata, beheranzko graduatzaileetan ere, *gutxi-gutxiago-gutxien* adberbioa muzin gabe onartzea. Bestea, goranzko konparatiboa 'ez' aurrizkiagaz ezeztea.

- *Los dos son malos, pero alguno será menos malo, ¿no? Ya eres menos niño. Cuanto más hombre seas, menos niño serás.*
- *¡Compren, compren, señores! ¡Dos regalos baratísimos!*
- *¿Cuál es menos barato?*
- *¡Este, señor!*
- *Ah, entonces me llevo el otro, que supongo será menos caro.*
- *Muy bien, señor, es usted muy listo.*

Euskaraz honela esan genitzake:

- *Biak dira txar, baina baten bat izango da gutxiago txar, ezta? Jada gutxiago ume zara. Zenbat (eta) gizonago zaren, hainbat (eta) gutxiago ume izango zara.*
- *Eros, eros, jaunak! Bi erregalu merke-merke!*
- *Zein da gutxiago merkea?*

- *Hauxe, jauna.*
- *Ah, orduan beste hau eramango dut, bera izango baita gutxiago garesti.*
- *Ederki, jauna, oso argia zara.*

Edo honela:

- *Biak dira txar, baina baten bat ez-txarrago izango da, ezta? Jada ez-umeago zara. Zenbat (eta) gizonago zaren, hainbat ez-umeago izango zara.*
- *Eros, eros, jaunak! Bi erregalu merke-merke!*
- *Zein da ez-merkeago?*
- *Hauxe, jauna!*
- *Ah, orduan beste hau eramango dut, ez-garestiago izango baita.*
- *Ederki, jauna, oso argia zara.*

Superlatiboan ere baliabide berak leudeke:

- *Txar-txarretan ere, baten bat izango da gutxien txar, ezta?*
- *Denak eskasak direnez gero, har dezadan, behintzat, gutxien eskasa.*
- *Anaietako zein esan duzu?*
- *Gazteena eta baxuena.*
- *Baxuena? Bi metrotik gora baitira denak!*
- *Ba, jar ezazu gutxien altua, eta aurrera.*

Edo honela:

- *Txar-txarretan ere, baten bat izango da ez-txarrena.*
- *Denak eskasak direnez gero, har dezadan behintzat ez-eskasena.*
- *Anaietako zein esan duzu?*
- *Gazteena eta baxuena.*
- *Baxuena? Bi metrotik gora baitira denak!*
- *Ba, jar ezazu ez-altuena, eta aurrera.*

Soluzio bakarra hautatu beharrik ez dago. Biak utz daitezke aukeran. Hizkuntzan uste gabeko zokondo asko agertu ohi da, eta gehienean, bata hobeto iruditu arren, zenbait kasutan, bestea egokiago etor daiteke. Garbi dagoena da beheranzko graduatzaileek goranzkoek bezain eremu propioa eta egiazkoa osatzen dutela, nahiz eta praktikan, goranzkoak





askoz erabiliago izan. Egitura hori ezin da, gramatiketan agertu ohi denez, antonimoen eta gisako ebasioen esku utzi. Hurrengo atalean aipatuko dugunez, *"zenbat naizen maitagarri"* kantatu duenak berdin natural kanta dezake: *zer gutxi zaren maitagarri, orain lehen baino gutxiago maitagarri zara, orain oso gutxi maitagarri zara, oraintxe zara gutxien maitagarri.*

## *Zenbat* gehi adjektiboa

*Zenbat* galdekaria izenei eta aditzei dagokie, kantitatea adierazten duenean: *zenbat ogi, zenbat ardo, zenbat etxe... zenbat jan duzu, zenbat ikasi duzu, zenbat behar duzu,* eta abar. Kalitatea adierazten duten aditzekin ere normala da: *zenbat sakondu behar da zulo hau? Zenbat handitu zaren! Ez dut pentsatu nahi zenbat zahartu naizen.* Ba al da adjektiboekin ere erabiltzerik? Ingelesean normala da hori, gaztelanian ez, frantsesean ez dakit.

Euskaraz ez da arrotza. *'Adios, ene maitia'* kanta ospetsuko ahapaldi bat honakoa da:

*Adios erraiten eta bihotzez ezin parti.*
*Nik ez dirot, bada, maitia, zurekin gau bat argi?*
*Orduan erran ziniro zenbat naizen maitagarri.*

Hor da amaieran, naturaltasun osoz, "zenbat naizen maitagarri". Hamaika aldiz galdetu diegu haurtxoei: *Zenbat zara nirea*? Eta *'nire'* hau adjektiboa da. Demagun norbait hain herritakoa dela frogatu nahian dabilela, birraitita, amama eta ez dakit zenbat ahaide hangoak dituela eta. Baina beste herri batean bizi da, eta han ere hainbat ahaide ei dauka. Azkenean, batek galdetzen dio:

*Bo! Orduan hi zenbat haiz hemengoa eta zenbat hangoa?*

*'Hemengo'* eta *'hango'* ere adjektiboak dira. Eta gainera, *izan* aditza kantitatez barik, kalitatez definitzen da. Hain zuzen, kantitateari kontrajarritzat jo ohi dugu honelako esaeretan: *Gauza bat da edukitzea, eta beste bat, izatea. Ez begiratu edukitzeari, izateari baizik. Ez zaitu edukitzeak handitzen, izateak baizik.*

*Bai dela ona, zein gaiztoa zaren, zer ederrak diren,* eta horrelako perpausa esklamatiboek ontasun, gaiztotasun eta edertasun handia adierazten dute. Oso ona, oso gaiztoa, oso ederra esatea bezala, baina indartsuago. Horietarako ez dugu, jakina, *zenbat*-en laguntzarik eskatzen. Baina kalitateak edo kualitateak ere badu eskala bat. Nolabait, kuantifikatu egin daiteke. Edertasunak edo ontasunak, adibidez, bere mailak dauzka. *Zenbat* galdekariak maila horiek adieraziko lituzke. Honela esan genezake:

- *Azeria argia izango da, baina berak ere ez daki zenbat den argi(a). Aukera bat eskatzen dut, zenbat naizen trebe(a)erakusteko. Zigor zuzena emateko, lehenik, zenbat zen kontziente(a)neurtu behar dugu.*

Esan beharrik ez dago *'zenbat naizen trebea'* eta *'zein trebea naizen'* oso kontzeptu ezberdinak direla. *Zenbat naizen trebea* norainoko trebetasuna daukadan da. Izan daiteke hutsa, gutxi, pixka bat, nahikoa, handia, izugarria... *Zein trebea naizen* esatean, ordea, trebetasun handia daukadala suposatzen da. *Aukera bat eskatzen dut, 'zein trebea' naizen erakusteko.* Hots,'oso trebea' naizela erakusteko.

Baina galderak erantzuna eskatzen du. "*Musikan zenbat zara trebe*" galdetzen badut, erantzuna *hutsa, gutxi, pixka bat, nahikoa, oso, asko, izugarri...* izan daiteke, erantzunean *'trebe'* ez baita errepikatzen. Horrek esan nahi du ondo legokeela erantzutea: *hutsa naiz trebea, gutxi naiz trebea, pixka bat naiz trebea, nahiko naiz trebea, oso naiz trebea, asko naiz trebea, izugarri naiz trebea...* Eskala honetan, batzuk badira lehendik ere kantitateari nahiz kualitateari aplikatzen zaizkionak: *nahiko trebea-nahiko diru, pixka bat trebe-diru pixka bat.*

Nire asmoa ez da, noski, eskala horretan denak, kantitatezko nahiz kualitatezko, indistintoki nahastea. Ez bedi uler, *'oso trebea'* bezala *'asko trebea'* esan daitekeenik (Ala bai?). Proposatzen dudan bakarra da ZENBAT galdekari kantitatezkoa, zenbait kasutan, adjektiboekin ere erabiltzea. Diferentzia aportatzen duen egitura baliatu egin behar da. Bitxi bada ere, adjektiboekin normala da *zenbat* gehi konparatiboa: *zenbat sakonago egin behar da zuloa? Zenbat zaharrago zara ni baino? Zenbat aberatsago izan nahi duzu?* Berdin adberbioekin: *Zenbat hobeto bizi gintezke? Zenbat astiroago joan nadin nahi duzu?*





## *Orainaldiko partizipioa*

Kontua da, iragana eta etorkizuna adierazteko, aditz batetik harako formak baditugun bezala (*joan-joandako/joateko, etorri-etorritako/etortzeko, sartu-sartutako/sartzeko),* ekintza presentea adierazteko modurik ez daukagula, gaztelaniak, adibidez, *nacido-naciente, salido-saliente* duen moduan. Baditugu, noski, aditz transitiboetan batez ere, ekintza adierazteko moduak: *aztertzaile, azterlari,* eta abar. Hauxe da esan nahi dudana: jaio dena 'jaioa-jaiotakoa' bada, eta jaioko dena 'jaiotzekoa', nola adieraz liteke 'jaiotzen ari dena'? Soluzio bat infinitiboa bera *–sortzen–* adjektibo bihurtzea izan liteke. *Ilargi sortzenak oles egiten dio eguzki sartuari eta haur sortzekoari.* Norbaitek eragotz lezake: "Zergatik behar dugu forma hori, *'sortzen ari den ilargia'* esan ahal izanda?". Derrigorra ez da ezer, noski, baina nik hitz bakar baten, adjektibo baten abantaila nahi dut.

Badugu atzizki bat, nahi dudanera hurbiltzen dena: TUN. Hor ditugu: *jatun, jakitun, ibiltun-ibiltaun, ihestun, hiztun, erostun, jostun...* Ez da atzizki ugaria. Egia da ekintza baten maiztasuna adierazten duela, eta gehienetan, bidezko denez, aditz transitiboei eransten zaiela. Intransitiboetan, ez dakit *'ibiltun-ibiltaun'* horretaz besterik baden, baina bera badago, eta, Bizkai aldean, behintzat, denok esaten dugu, edo esan dugu. Bere esanahia 'asko ibiltzen dena' da, *ibiltari* bezala. Esanahi horretarako, ARI-KARI-LARI eta LE-TZAILE atzizki guztiz komunak baditugunez gero, TUN atzizkia esaten ari naizen funtziorako erabiltzea interesgarri izan liteke, eta hala egin ohi dut, komeni dela iruditzen zaidanean. Horrela, *'eguzki sortuna' eta 'eguzki sartuna'* gaztelaniazko 'sol naciente' eta 'sol poniente' lirateke. Berdin honakoak: *olatu haustunak, harri erortunak, aurpegi sufrituna, bizi hiltuna, zeru argituna* (ez 'argiduna'), *denbora etortuna eta joatuna* = hausten ari diren olatuak, erortzen ari diren harriak, sufritzen ari den aurpegia, hiltzen ari den bizia, argitzen ari den zerua, etortzen eta joaten ari den denbora. Kontestu batzuetan berdintsu izan badaiteke ere, OR-KOR edo OI-KOI atzizkiek beste kontzeptu bat adierazten dute, zerbaiterako joera edo grina. *Hauskor, erorkor, hilkor, etorkor, joankor...* adjektiboek beste esanahi bat lukete.

## Neologismo beldurgarriak

Neologismoen baliabidea nahitaezko da, noski, eta egoki ere bai, argitasuna eta zehaztasuna lortzen direnean. Baina propietate horiek garantizaturik ere, hitz beldurgarriak sor daitezke, luzez eta astunez. Gure hiztegiak horrelako hitzez beterik daude. Erremedioa ez da beti erraza, baina badirudi, batzuetan, luzerak txunditzen gaituela, baliabide laburragoak eta, sarritan, egokiagoak eskura izanik. Hona adibide batzuk: *Ohartarazpen, desbideratu-desbideraketa, ospitaleratu, kartzelaratu, bozeramaile*... Beldurra ematen du esan beharrak: "*Ohartarazpen bat hartu dut*". "*Bigarren bihurgunea amaitzean, desbideraketa bat aurkituko duzu, eta segi bertatik*" (buff! zer duk 'desbideraketa' hori!!? buelta emateko gogoa ematen du). "*Bihar ospitaleratuko naute*" (hitzaren arabera luzatzen bada, ez haiz berehala itzuliko). "*Bozeramaileari argitasun gehiago eskatu zioten*" (nola emango du argitasunik bere izena eramaten ere nahiko lan daukanak?). "*Taupada-markagailua jarri didate*" (izorrai!!).

Laburragoan, berdin argi edo argiago ikusten ditut: *Oharpen, desbide-desbidetu, ospitaldu, kartzelatu, taupagailu-bihozgailu*... 'Bozeramaile' hitzaren kasua nabarmena da, bai esaten ari garen zentzuan, bai 'boz' hitzaren degradazioan. 'Boz' izenetik 'bozkatu' aditza dator. Hori, Iparraldean. Hegoaldean, kanpaiak entzun dira, eta 'bozkatu' aditzetik deduzitu dute izena 'bozka' dela (*bota-bota beste bat, bota tragotxo bat*). *Bozka, bota, botoa*... dena bat! Hitzaren beste adieratik, 'bozeramaile', Gaztelaniaren ('portavoz') itzulpen literala. Bada, zentzu handiagoz, 'eledun' hitza ere, baina ezin du nagusitu. 'Boz' hitzetik abiatzekotan, ezin al zitekeen 'bozdun' sortu? Hitz laburra eta beste tramankulu abailgarri hori bezain argia edo argiagoa. Nago alferrik izango dela. *Ospitaleratutako bozeramaileek bozken desbideraketari ekingo diote*. Hizkuntza potentea daukagunik ezingo zaigu ukatu.

## Erreflexiboa, inpertsonala, elkarkaria

Erreflexiboa, hain garrantzitsua izanik, erdizka edo zalantzan daukagu oraindik. Ikus ditzagun, lehenik, bere antzeko egitura duten inpertsonala eta elkarkaria. Inpertsonalak badu soluzioa. Elkarkariak, ez oso-osoa, neure ustez.





1) Inpertsonala

- *Hemen ondo jaten da. Neguan eguzkia asko estimatzen da. Hemen erruki gabe gastatzen da. Itsas ondoan gustura pasiatzen da. Hori ez da jakiten.*
- *Hala diote. Hemen ondo ematen dute. Hemen ondo bizi dira. Hemen asko kobratzen dute. Hemen artistak oso maite dituzte.*
- *Hemen jantziari asko begiratzen zaio. Han modari ez zaio garrantzirik ematen. Gurean inori ez zaio aterik ixten.*
- *Hemen ondo atenditzen zaituzte. Hemen lasai bizi zaitezke. Herri txikietan asko kontrolatzen zaituzte.*

2) Elkarkaria

- *Elkar maite dute. Ezagutzen al dugu elkar? Elkar jo dute.*
- *Batak bestea* ('*bata-bestea*' ere bai) *salduko lukete. Batak bestea (bata-bestea) ikusi ere ezin dute egin. Batak bestea (bata-bestea) jango lukete.*

3) Neure, heure, bere...burua

- *Bere burua hil du. Norbere burua zaindu behar da. Ez dakusk heure burua. Ez al duzu zeure burua gehiegi baliesten? Euren burua galdu zuten.*

Beste era batzuk ere egongo dira. Hemengo helburua ez da dagoen guztia ematea, ez dagoena seinalatzea baizik, eta uste dut hutsune handi samarra daukagula.

*Burua*-rekiko forma, oso geurea eta berezia izanik, ez da aski, erreflexiboa hornitzeko. Egitura funtzional bat baino areago, modismo bat da. Oso ondo dago, baina tramankulu handiegia, kasu guztiak beragaz konpontzeko. Hona erdarazko zenbait adibide:

- *Amate y amarás. Mírate bien y te sorprenderás. Nos cuidamos como reyes. Me odio. Imaginaos en un globo. No os infravaloreis.*

Esaldi horiek, normalean, honela esango genituzke, gutxi gorabehera, euskaraz:

- *Maita ezazu zeure burua eta maite izango duzu. Begiraiozu ondo zeure buruari eta harrituko zara. Geure burua erregeak bezala zaintzen dugu. Neure burua gorroto dut. Imagina itzazue zeuen buruak globo batean. Ez ezazue zeuen bururik gutxiets.*

Erdararen aldean, luze irten zaizkigu. Saia gaitezen laburtzen.

- *Maita zeure burua eta maiteko duzu. Begira ondo zeure buruari eta harrituko zara. Geure burua errege bezala zaintzen dugu. Neure burua gorroto dut. Imajina zeuen burua globo batean. Ez zeuen bururik gutxiets.*

Gehiago laburtzen hasten bagara, esaldi artifizialak aterako zaizkigu, edo esaldiak aldatu beharko ditugu. Hona orain beste itzulpen posible bat:

- *Maita zaitez eta maite izango duzu. Begira zaitez eta harrituko zara. Erregeak bezala zaintzen gara. Gorroto naiz. Imajina zaitezte globo batean. Ez zaitezte gutxiets.*

Era laburragoan:

- *Maita zaitez eta maiteko duzu. Begira zaitez eta harrituko zara. Errege bezala zaintzen gara. Gorroto naiz. Imajina zuek globo batean. Ez zeuek gutxiets.*

Problema ez da, noski, luze-laburra, baina badu bere garrantzia. Hala ere, ez da horregatik, egituragatik beragatik baizik. Aditza intransitiboan jartze hori gaizki al legoke? Ez dut uste, eta arrazoitzen saiatuko naiz.

Gauza jakina da euskaraz aditz intransitibo soilak daudela, sekula transitibo izan ez daitezkeenak. Hala, *egon, joan, jausi, erori* eta abar. Beste batzuk, transitibo hutsak, sekula intransitibo izaterik ez dutenak: *esan, jan, ikusi, ikasi,* eta abar. Eta beste batzuk, bitzuak, transitibo nahiz intransitibo izan daitezkeenak: *sartu naiz-sartu dut, jarri naiz-jarri dut, altxatu naiz-altxatu dut, hustu naiz-hustu dut, beztu naiz-beztu dut,* eta abar.





Bietariko horiek interesatzen zaizkigu. Aditz transitibo bat intransitibo bihurtzea ez al da, kasu askotan, forma erreflexiboa hartzea? Jar ditzagun bi zerrenda:

| | |
|---|---|
| *Sartu naiz* | *Neure burua sartu dut* |
| *Altxatu naiz* | *Neure burua altxatu dut* |
| *Galdu naiz* | *Neure burua galdu dut* |
| *Hondoratu naiz* | *Neure burua hondoratu dut* |
| *Errenditu naiz* | *Neure burua errenditu dut* |
| *Ito naiz* | *Neure burua ito dut.* |

Egia da badela alde handi bat bi zutabeon artean: ezkerrekoetan "nahi gabe" gertatzen dira ekintzak, edo gerta daitezke. Eskuinekoetan, badirudi nahita izan behar duela. Badakit, banaka harturik, ñabardura ezberdinak dauzkatena. '*Hondoratu naiz*' formak hondoratzearen egintza soila adierazten du. Beste batek hondora nazake, edo berez hondora naiteke. '*Neure burua hondoratu dut*' esaldiak, ordea, bistan da beste hondoratze mota bat adierazten duela, non neu naizen hondoratzearen eragile. Baina, nahitasun edo intentziotik aparte, bloke biak, sinonimo hertsitzat ez bada ere, egitura paralelotzat jo daitezke.

Aditz intransitiboa transitibo bihurtzeko badaude beste baliabide batzuk ere: *ibili-erabili, jaitsi-eraitsi, itzarri-iratzarri...* non artizki batek zentzu kausatiboa damaien. Baita '*arazi*' aditza ere, atzizki gisan erabilia: *ito-itoarazi, hondatu-hondarazi, galdu-galarazi, etorri-etorrarazi...* Badira honen sinonimoak, *arazo-azo, eragin,* eta abar.

Esan beharrik ez dago forma guztiek badutela euren nortasuna eta eremua, eta sarritan, euren kutsu aparta ere. Sinonimoak ez dira inoiz guztiz berdinak. Baina interesatzen zaigun honetan, gorago aipatu blokeen artean bada hurbiltasun handi bat. Hurbiltasun horrixe tiratzen ari naiz, hain garrantzitsua den egitura erreflexiboa ondo hornitzeko.

Har dezagun *konbentzitu* aditza. Baliteke beste norbaitek ni konbentzitzea. Orduan, *konbentzitu nauzu, konbentzitu naute, ez nau konbentzitzen...* Baina *konbentzitu naiz* diogunean, nor da konbentzitze horren eragile? Ez al da *konbentzitzea* jardun mental bat, nork bere buruari

eragiten diona? Beraz, *konbentzitu naiz* eta *neure burua konbentzitu dut*, intelektualki, sinonimo hertsitzat jo daitezke, nahiz eta oso esamolde ezberdinak izan. *Neure burua konbentzitzeak* nitasunaren eragina gehiago nabarmentzen du, baina, azken batez, *konbentzitzea* norbere baitako egintza bat da, norbere ahalmen bat garatzea. Subjektu nagusia norbera da.

*Sumindu naiz, amorratu naiz, eskarmentatu naiz, lokartu naiz, nahasi naiz, aurkitu naiz, aurkeztu naiz, lehertu naiz...* Hauek eta antzeko ehundakak norbere baitan edo norberagan gertatzen diren egintzak dira, norbera subjektu nagusi dela. Suminaren, amorruaren, eskarmentuaren, loguraren... aktibatzaileak kanpotik etor daitezke, baina, azken batez, norbera da sumintzen, amorratzen, eskarmentatzen, lokartzen... dena. Norberak norbere burua. Izan daiteke, noski, '*sumindu nau, amorratu naute*' eta abar ere, baina orain intransitiboa interesatzen zaigu.

*Konbentzitu dut-konbentzitu naiz, aurkitzen dut-aurkitzen naiz, aurkezten dut-aurkezten naiz, torturatzen dut-torturatzen naiz, behartzen dut-behartzen naiz, ezkutatzen dut-ezkutatzen naiz, babesten dut-babesten naiz, harritzen dut-harritzen naiz, arrastatzen dut-arrastatzen naiz...* ondo badaude, zergatik egongo dira gaizki: *gorroto naiz, maite naiz, ezagutzen naiz, ikusten naiz, sentitzen naiz, begiratzen naiz, izendatzen naiz, errespetatzen naiz, uste naiz, higuin naiz*, eta abar?

Har dezagun, agian, arraroen dirudien '*uste naiz*'. Demagun erdarazko esaldi hau: *A veces me creo grande, otras veces un gusano*. Euskaraz honelako itzulpenak joango lirateke: *Batzuetan, handia naizela uste dut; beste batzuetan, zomorro bat*. *Batzuetan, neure burua handi iruditzen zait; beste batzuetan, zomorro bat*. Eta zergatik ez beste gabe: *Batzuetan, handi uste naiz, beste batzuetan, zomorro*? *Batzuetan, handi aurkitzen naiz; batzuetan, handi sentitzen naiz; batzuetan, handi amesten naiz; batzuetan, handi imajinatzen naiz*. Hauetan eta aurreragoko adibideetan, batzuek ondo ematen dute, beste batzuek hala-hola, eta beste batzuek gaizki. Zergatik ez denak ontzat jo, denak egitura berekoak badira? Hala eginez gero, baliabide honek, laburtasun handia ekarriz gainera, erreflexiboaren eremu osoa harrapatuko luke.

Honek ez du inola ere esan nahi '*neure, heure, zeure, bere...burua*'





baztertu behar denik. Ez da forma bata bestearen aurka planteatu behar, aukeran baizik. Batzuetan, bata hobeto egongo da, eta beste batzuetan, bestea, eta maiz gertatuko da nahitaez bata, eta ez bestea izatea. Gaztelaniaz ere, batzuetan '*a sí mismo, a ti mismo, a nosotros mismos*' eta abar jartzen dute, ekibokoa saihesteko, indarra emateko, edo bariazioagatik, beste gabe.

Pare bat hitz ELKAR izenordainaz. *Elkar* ez da erreflexiboa, erreziprokoa baizik. Orduan '*elkar ondo ezagutzen dugu*' eta '*ondo ezagutzen gara*' oso ezberdinak lirateke. '*Elkar ezagutzea*' batak bestea ezagutzea da, nahiz eta, agian, bakoitzak bere burua ez ezagutu. '*Ondo ezagutzen gara*', berriz, bakoitzak geure burua ondo ezagutzen dugula litzateke. *Ondo ezagutzen naiz = neure burua ondo ezagutzen dut*. *Ondo ezagutzen gara = geure burua ondo ezagutzen dugu, bakoitzak bere burua ondo ezagutzen dugu*. Erdaraz, bietan *nos conocemos* da. Elkarrekikotasuna zehaztu nahi dutenean, '*mutuamente, el uno al otro*', eta abar jarriko dute. Erreflexiboa zehazteko, berriz, '*a nosotros mismos*', eta abar. Euskaraz, horretan, abantailan geundeke.

Kontzeptu ezberdin bat adierazteko era bat badaukagu, hori ezin da ezabatu. Eta gutxiago, bi kontzeptu hain ezberdin sinonimo gisan nahasi. Predikari batek, kontzientziari mintzo zaiola, baina entzule bakarra barik, asko dauzkala, hots egin dezake: *Azter itzazue zeuen buruak, ezagut zeuen buruak, eta agian maiteko dituzue, agian gorrotatuko*. Edo esaten ari naizen beste eran: *Azter zaitezte, ezagut zaitezte, eta agian maiteko zarete, agian gorrotatuko*. Eta ondoren esan dezake: *Baita ezagut ezazue elkar, eta agian elkar maiteko duzue*. Hemen ezin da inoiz '*ezagut zaitezte*' erabili, eta gutxiago, '*ezagut zaitezte elkar*'. Bila dezagun falta dena, baina ez dezagun daukaguna nahas.

## Kontsekutiboa

Perpaus kontsekutiboetan, oraindik hainbat zalantza nabari da. Eta okerrena, sarritan, esaldi zelebreak entzuten direla, egitura soil bat aplikatzea besterik izan behar ez lukeenean. Hona erdal adibideak:

- *Es tan bueno, que ni se queja. Son tan cobardes, que no saben ni protestar. Estoy tan metido, que no veo salida.*
- *Tiene tanto dinero, que no sabe cómo gastarlo. Utilizamos tal carga, que volamos tren y puente. Sufro tanto, que no sé ni cómo vivo. Comió tanto, que lo vomitó en la mesa.*

Perpausaren lehen partean ez da problemarik izaten. *Hain ona da, hain da ona...* Baina hortik aurrera, lanak. Bi partikula hauek jotzen ditut egokien: EZEN eta NON. Bakarra hartu behar banu, EZEN.

- *Hain ona da, ezen ez da kexatu ere egiten. Hain koldarrak dira, ezen protestatzen ere ez dakite. Honen sarturik nago, ezen ez dut irteerarik ikusten.*
- *Hainbeste diru dauka, ezen ez daki nola gastatu. Halako karga (hain karga handia, hainbesteko karga) erabili genuen, ezen trena eta zubia lehertu genituen. Hainbeste sufritzen dut, ezen ez dakit nola bizi naizen ere. Hainbeste jan zuen, ezen mahian bertan oka egin zuen.*

Berdin NON partikularekin. *Hain ona da, non ez da kexatzen.* EZEN edo NON hauen menpean doan aditza honela ere jar daiteke: *hain ona da, ezen ez baita kexatzen.* Edo: *hain ona da, ezen ez den kexatzen.* Ni formarik sinpleenaren aldeko naiz. Egitura funtzionalak ez dio hainbeste begiratu behar erretorikari, funtzioari baizik. Bigarren forma hauetan menpetasuna biek markatzen dute, partikulak eta aditzak. Zenbat eta sinpleago, hainbat funtzionalago. Badakit hizkuntza literarioan bitasun hori nagusi dena (partikula gehi *bait* edo *–n*), baina, bizkaieraz, behintzat, batere problemarik gabe esan eta idatzi izan da beti: *hain zara guzurtia ze, egia zer dan be ez dakizu. Hain da harroa ze, bere gorputza zelan erabili ez daki.*

ZE, ZEREN, EZEN sinonimoak izanik, EZEN iruditzen zait egokiena





funtzio honetarako, ZE eta ZEREN beste eginkizun batzuetarako utzirik. Jasan ez daitekeena da hain gauza sinple batek hainbeste trakeskeria sortzea oraindik. "*Hainbeste diru dauka, ez dakiela zer egin*", eta gisakoak. Gaztelaniazko '*que*' kontsekutiboa *-tan, tanto... que-* konpletibo bihurtu, eta aurrera bolie. Aurkitu izan ditut euskara irakasleak, hori eta antzeko kastellanismoak defendatzen, hizkuntzaren eboluzioa dela eta. Baikortasun hori eskertuko nuke, eboluzioaren formetako bat degradazioa dela ez baneki.

## Bokatiboa

Deklinabide-kasu honetan, praktika bikoitza eta ordenagabea gero eta zabalduago doa, beti ere artikulu mugatudun formaren alde, eta behar lukeenaz bestera, hain zuzen. *Geldi, adiskidea!, ene Jainkoa!, zer diozu, andrea?, zer diozu, gizona?,* eta gisakoak normalak dira. Baita honelakoak ere: *Kaixo, lagun; alde hemendik, ume; aizu, gazte; nora zoaz, emakume; geldi, morrosko; aurrera, mutil; nondik zatoz, txiki; zer diozu, enetxo...* Eta ez gutxitan, bi formak nahastean: *Aupa, gizona, jaiki, mutil,* eta abar.

Nire euskalkian, bizkaieran, ez naiz gogoratzen animaliei sekula artikulu gabe deitzen entzun dudanik. Beti: *Txakurra! Arre, astoa! Txarria! Zapi, katua!* Eta horrela. '*Jauna*' ere, bera bakarrean, beti artikuluagaz datorkit belarrira, nahiz eta beste laguntza batzuekin mugagabean entzun edo, behintzat, irakurri izan: *Ene aita eta jaun; gure babesle eta jaun.* Eta abar.

Zer egin? Ez dago dudarik norabidea artikulu gaberantz hobetsi behar dela. Ohitura luzeak belarrira sartu digun guztia bat-batean moztu beharrik ez dago, eta gero ere gera daitezke salbuespenak, baina bokatiboa, euskaraz ere, artikulu mugatzaile gabe hobeto legoke. Eta, kasu askotan, halaxe egiten dugu. Bidezkoago da, beraz, hobeto egiten dugunari jarraitzea, hain ondo egiten ez dugunari baino.

## Generoa

Euskal gramatiketan, generoak oso eremu txikia dauka. Euskaraz generorik ez dagoela (aditzean bai) suposatu ondoren, zenbait xehetasun ematen da, animalien sexuaren araberako izenei buruz: *zaldi-behor, behi-zezen, astar-asteme, katar-kateme*... Berdin gizakumeetan: *mutil-neska, gizon-andre, aitita-amama, seme-alaba*... Gero SA atzizkiaren erabilera mugatua, beste zenbait zertzelada, eta kito. Euskaraz generorik ez badago, ikasten lan bat gutxiago. Baina gero praktikak jipoituko gaitu.

Ez dakit euskarak generorik baduenetz, baina nire buruan, behintzat, badago. Euskaldunik gehienen buruan ere bai. Eta ez orain bakarrik, aspaldiko mendeetan baizik. Zenbat denbora da euskal hiztunek *kokolo-kokola, mozolo-mozola, txotxolo-txotxola, lelo-lela, tonto-tonta, grazioso-graziosa*... bereizi dituztela?

Nahiz eta gramatiketan generorik eza azaldu eta sinetsi, praktikan ezin diogu generoari ihes egin. Ez dut azken mendeotan bizkaitarrik imaginatzen, neska bati "*hi haz hi kokoloa!*" esaten. Bizkaitarra diot, *kokolo* adjektiboa euskalki horretakoa delako. Andrezkoari doakionean, honela esango da: "*hi haz hi kokolea-kokolia-kokolie-kokoli*"... azpi-euskalkien arabera. Beste euskalkietan ere, aise aurkituko duzu adibide ugari.

Beste kontu bat da femeninoaren forma erromanikoa onartu ala ez, edo nola onartu. Generoak latinez ere ez du dena hartzen. Gaztelaniaz O bokalez amaituak femeninoan A bilakatzen dira, baina ez beste bokalak: *alegre, amable, cursi,* eta abar. Ezta zenbait kontsonantez amaituak ere: *cabal, jovial*... Bai, ordea, beste batzuk: *cuarentón-cuarentona,* eta abar. Ez naiz hasiko hemen gaztelaniazko generoaren eremu luzea azaltzen.

Ingelesaren jenero-egitura gaztelaniaren (eta, seguruenik, hizkuntza erromaniko guztien) oso ezberdina da. Hizkuntza horretan ere, hein batean, generorik ez dagoela esan daiteke. Baina gero, generoa adieraztea komeni zaion guztian asmatzen da moduren bat. Azkenean, ingelesez ere generoak oso eremu zabala hartzen du.

Orain arte esan nahi dudana da euskaldunen buruan badagoela





generoa, badagoela hizkuntza-kategoria hori. Buruan badago, hizkuntzak premia horri erantzun egin behar dio. Eta ez da nolanahiko premia, ez da huskeria bat, oso kontzeptu garrantzitsua eta etengabea baizik.

*SA* atzizkiak ez dirudi gehiegi hedatzekoa denik, lanbideez eta andre-gizonen erreferentziaz harago: *artzaintsa, jainkosa, alarguntsa*... Edo hain izeneko gizon baten andrea: *Txominesa* = Txominen andrea, *Felipesa* = Feliperen andrea.

Zer egin? Lehenengo eta behin, hain erabilera errotua daukan eredu erromanikoa onartu ala ez, erabaki. Soluzio hoberik aurkezten ez den bitartean, onartu egingo nuke. Eta aurrerantzean, gramatiketan, euskal egitura bat gehiago bezala natural sartu. Eta hortik aurrera, beste baliabide batzuk ere aztertu. Euskaldun guztien edo gehienen ahotan, *tonto-tonta, guapo-guapa, txotxolo-txotxola* formak nagusitu badira, zer arrazoi dago baliabide hori erauzteko? Hainbeste hitz solte eta garrantzibako onartu baditugu, egitura garrantzitsu bat galeraztetik zer abantaila dator?

Honetan, fantasia apur bat eginez, geure aditzean daukagun elementuaz ere, *N* femeninoaren adierazleaz, ez al gintezke balia? Ez al genezake atzizki hori aditzetik beste arlo batzuetara korriaraz? Zeren, deskuidatzen bagara, aditzean ere galdu egin behar zaigu. Bestalde, izen berezietan, femeninoa *NE* atzizkiz adierazten ohituak gaude: *Agurne, Gotzone, Garbiñe, Maitane, Ikerne, Nekane*... Ez dakit neologismo horiek aditzaren *N* horregaz zerikusirik daukaten, eta ardura ere ez dit orain. Dakidana da euskaldunen buruan, *N* kontsonanteak baduela berehalako asoziazio bat femeninoagaz. Ez al genezake asoziazio hori baliatu? Ez dut adibiderik emango, bai baitakit, honela bat-batean, gehiegizko ausarkeria eman dezakeela, arbitrarioegia. Soil-soilik, planteatu besterik ez dut egin nahi.

Generoa euskaldunon buruan badagoela emanik, eta dena delako soluziora iritsi ondoren, hitzen generoak ez dauka bat etorri beharrik beste hizkuntzetako kideen generoagaz. Demagun, adibidez, gaztelaniaz: *¡Qué carrera más tonta hiciste!* Euskaraz, *tonto* hitza erabilita ere, *bai lasterketa tontoa, bai karrera tontoa, bai arineketa tontoa*... esango genuke. Berdin *itxura kokoloa, figura konkaboa, indar atomikoa*... eta ez *itxura*

*kokola, figura konkaba, indar atomika...* Horrek esan nahi du hitz horiek maskulinotzat dauzkagula euskaraz. Berdin: *Orkestra sinfonikoa, orkestra filarmonikoa, lasterketa klasikoa...* Beraz, izena ezabatu eta adjektiboa bakarrik esaten denean, hobeto legoke: *Londongo Sinfonikoa, Vienako Filarmonikoa, Donostiako Klasikoa, alderdiko exekutiboa,* eta abar. Oro har, genero femeninoa gizaki eta animalietan bakarrik markatzekoa litzateke.

Hitanoan nola tratatzen dugu, adibidez, ilargia, generoa aplikatu nahi diogunean? Batzuetan *no*-ka, bestetan *to*-ka. Komeni zaigun trataera damaiogu, eta biak daude ondo, kontestuaren arabera. Gure inguruko hizkuntzetan, hori ez dago pentsatzerik. Euskaraz, beharbada, 'komeni zaigun' horixe ('komenentzia', alegia) izan daiteke generoaren atal hau euskaraz planteatzeko irizpiderik egokiena. Beste zenbait gauzatan bezala, generoan ere, berandu gabiltzanez gero, egin dezagun komenien zaigun moduan, hori ere hizkuntza-lege bat baita. Horretan, ingelesari euskaragaz batago eta imitagarriago deritzot gaztelaniari baino.

Atal hau amaitzeko, euskaraz generoan hutsune handi bat daukagula uste dut. Teorian gauza bat, praktikan beste bat, dualitate hipokrita bat luzatzen ari gara. Eredu erromanikoa beste gabe hartzea astakeria bada, oraingo indefentsioa eta praktika orokor 'ilegala' okerragoak dira. Eredu hori onartuta ere, noraino hedatu aztertu beharko litzateke. Eta hortik harago eta euskararen barrutik, agian, generoaren beste arlo batzuk ere garatu beharko lirateke. Dudarik ez daukadana da euskal generoa birplanteatu beharra dagoela, hala uste dugunon artean, behintzat. Ezetzean daudenek segi bezate euren zorionean.

## Genero neutroa

Generoan gabiltzanez gero, euskaraz neutrorik ez dagoela esan ohi da. Ar-emetasunik egon ezik, gutxiago neutrorik. Eta gehienean, hain gabe ondo goaz. Esaterako: *Lo peor es que, lo más hermoso, lo que quiero, no es lo normal...* Euskaraz: *okerrena da, ederrena, nahi dudana, ez da normala...* Ez dugu bereizten *EL que quiero, LA que quiero, LO que quiero.*

Baina, batzuetan, eta zenbait diziplinatan, sarritan, ez dago ihes





egiterik, neutrotasuna bereziki markatua baita. Orduan, soluziorik onena ZER iruditzen zait. Adibidez: *Existe lo absoluto, no el absoluto.* Edo alderantziz: *Creo en el absoluto, no en lo absoluto.* Euskaraz: *Zer absolutua badago, ez absolutua. Absolutuan sinesten dut, ez zer absolutuan.*

Berdintsu esan dezakegu: *Zer perfekturik ez dago. Zer transitiboa eta intransitiboa kontzeptu osagarriak dira. Unibertsoan ez dago zer tenporalik, dena baita espaziala. Ezagutzen al dugu materia, zer ez-materiala definitzeko?* Hauek guztiak argi dago beste hizkuntzetara neutroan itzuli beharrekoak direla.

Zientzia hizkeran ez ezik, hizkera arruntean ere, forma hori oso erabilia da, eta izan da. *Hemen zer normala da jan nahi duenak lan egitea. Neguko zerik politena sutondoa da. Zer gordinak higuina ematen dit...* Gainerako euskalkietan ez dakit, baina bizkaieraz, honelakoak noiznahi entzungo dira. Erdaraz, berriz ere, 'lo' agertuko da.

GAUZA ere erabili izan da, eta erabiltzen da, gehiago, beharbada: *Gauza onak ez du txarrik. Gauza zaila gehiago gogoratzen da. Gauza tragikoak gehiago tiratzen du.* Horiek gaztelaniaz "lo bueno, lo difícil, lo trágico" dira. Nik neuk, biak ontzat emanik, funtzio horretan bat hobestekotan, ZER hautatuko nuke.

ZER pluralean eta mugagabean ere erabil daiteke. Deklinabide osoa dauka. *Zahartzaroak ere badauzka bere zer onak. Eguzkiaren zerik onenak epela eta itzala dira. Hamaika zer polit ikusia naiz munduan. Zer,* beraz, *gauza*-ren sinonimotzat jo dezakegu, eta da, atzizkiak ere har ditzakeelarik: *zera, zeraren, zerari... zertxo, zertu, zertsu, zerbait, zergai, zertasun...* Baita aurrizkia ere: *ezer.*

Horiek horrela, norbaitek esan dezake hau ez dela berez neutroa. Zer da, ba, *'berez neutroa'*? Niri ardura zaidana neutroa adierazteko balio izatea da. Ondo adierazten badu, euskaraz ere badela neutroa esan dezakegu. Kontzeptua baldin badaukagu, eta adierazteko modua ere bai, diskisizio gramatikala hutsa da.

## *Hitanoa galderazko perpausetan*

Hitanoan ari garela, galderazko perpausetan alokutiborik ez erabiltzea arautzat jarri da. Adibidez: *Kaixo! Etorri al haiz? Hire gurasoak ere etorri al dira? Bai, bazakiat, baina esaidak noiz izango den. Noiz izango da eguna, heure etxean lasai ikusi ahalko hautana? Ederki gaudela bistan duk, baina ez al naiz inoiz joango? Hi! Zer ordu da?*

Txillardegik bere Euskal Gramatika-n, 348. orrialdeko 31.7 paragrafoan dio: "Bide beretik, galderetako adizkiak ez dira aldatzen: *Nor etorri DA etxera*? (gero eta maizago entzuten bide da, gure literaturi isuriaren aurka, *nor etorri duk*?). *Nor joan DA izebaren etxera*?".

Praktika horrek literaturan bere 'isuria' eduki lezake, baina hizkuntza mintzatuan belarria apurtzen du. Literaturan bada Jainkoari ere hika mintzatzeko tradizioa. Hala ere, ez dut imajinatzen moja bat Jainkoari hitanoan otoitz egiten. Zehar-galderetan (*ba al dakik zer ordu den; esaidak hire buruak zenbat balio duen*), erlatibozko aditzetan (*gehiago ez diat ikusi atzo agertu zena*), eta, oro har, menpeko perpaus guztietan (*hori gertatzen bada gaizki behar duk; habil azkar, azken aukera baita*), ondo ulertzen da araua. Herri-hizkeran, aditz guztiak, nahiz eta menpekoak izan, baita baldintzazko, denborazko eta bestelako ere, hitanora aldatzeko joera izan da (*gehiago ez diat ikusi atzo agertu zuana*), leku batzuetan gehiago, beste batzuetan gutxiago. Gehiegikeria sarritan kakofoniko hori bahetzea onartzen dut, baina ez galdera direktoak atzemateraino. Kolpea nabarmenagoa da, galdera barruan '*hire*' posesiboa ageri denean. Txillardegiren adibidean, "*nor joan da izebaren etxera*" aiseago pasa daiteke, "*nor joan da hire izebaren etxera*" baino. Hau oso mingarri da belarrirako.

Euskaraz, perpaus barruan beste galdekaririk ez denean, AL partikula eta A aditz atzizkia daude, galdera adierazteko. *Ba al da? Badea*? Baina ia euskaldunik erdiek ez dute, azken mende batzuetan, behintzat, intonazioaz beste seinalerik erabili galderazko perpausetan. Eta AL edo A darabiltenak ere sarritan gelditzen dira intonazio hutsean. Demagun batek baieztapen hau egin duela: *Udaberria gaur hasi da*. Baina segidan duda etorri zaio, eta gauza bera galdetzen du: *Udaberria gaur hasi da*? Hitanoan, eta biak jarraian esanda, bi esaldiok honela behar dute, arau horren arabera: *Udaberria gaur*





*hasi duk. Udaberria gaur hasi da*? Ez daiteke izan. Intonazioak ez du aditza ezertan aldatzen. Baiezko-ezezkoetan nahiz hauen galdera direktoetan, aditzaren izaera berbera da. AL edo A daramatenean, agian, pentsa liteke aditz hori zerbaiten menpean dagoela. A aditz atzizkia izanik, baliteke hori gertatzea. Baina AL partikulak, behintzat, ez dio aditzari *ba-*, *ez* edo *omen* partikulek baino gehiago eragiten.

Beraz, goragoko esaldiek honela behar dute: *Kaixo! Etorri al haiz? Hire gurasoak ere etorri (al) dituk? Bai, bazakiat, baina esaidak noiz izango den. Noiz izango duk eguna, heure etxean lasai ikusi ahalko haudana? Ederki gaudela bistan duk, baina ez (al) nauk inoiz joango? Hi! Zer ordu duk*?

## *Subjektua, atributua eta adberbioa*

Hiru kategoria hauek deklinabidean uniformatzeko gero eta bide azkarragoa daramagu, eta pobrekuntza tamalgarria letorke. Gero eta gutxiago bereizten da *salda beroa dago* eta *salda bero dago*. Erdaretan ere argi bereizten da: *hay caldo caliente* eta *el caldo está caliente*. Euskaldun askok era bakarrez adierazten dituzte biak: *salda beroa dago*. Kontestuak erabakitzen du noiz den bata eta noiz bestea. Adjektibo nahiz izen, adberbio eginkizuna betetzen duenean, mugagabean eta mugigaitz uzteko tradizioa hobetzat jo behar da, duda gabe, nahiz eta, agian, minoritarioago izan. Honela, *salda beroa badago, piper hau gorria da, piper gorriak amaitu dira, piper hauek berdeak dira*, baina *salda hau ez dago bero, piper hau oso bero dago, piper hauek berde daude oraindik, aurten belarra ugari dator, prezioak altu dabiltza*, eta abar.

Bereizkuntzari oraindik nahiko ondo eusten zaio, adjektiboak barik, izenak direnean: *orain alkate nago, buruzagi izendatu dute, presidente hautatu naute, gizon bihurtu dira, geuk egingo dugu aktore, asto jokatu du, atzelari jokatzen dut*... Gramatikalki ez dakit hauek denak berdinak, antzekoak ala zer diren, baina zer esan nahi dudan argi dago. Diferentzia garrantzitsu baten aurrean gaude, eta hori bereizten dutenen praktika hobetsi behar da, nahiz eta, zenbait kasutan, gutxiago izan.

'*Zenbait kasutan*' diot, zeren bereizmen osoa galdu duenik nekez izango baita. *Piper hauek oraindik berdeak daude* dionak, gero, duda gabe

esango dizu *hori argi dago* edo *gauzak argi daude hemen*. Beraz, areago litzateke koherentzia berreskuratzea, deformazio joera garbituz, arau berriak ikastea baino.

Adjektiboak edo izenak adberbio lana egiten duenean ez ezik, atributu denean ere, mugagabean uzteko tradiziorik ez da falta, batez ere Iparraldean eta, bereziki, zubereran. Horren arabera, *gaztea naiz* eta *gazte naiz* gauza ezberdinak lirateke. Lehenengoan *gaztea* atributu mugatua da. *Zu zein zara? Gaztea ala zaharra*? Eta erantzuna: *Ez, ni gaztea naiz*. Erdaretan: *yo soy el joven*. Beraz, bat baino gehiagoren artean mugatzen edo izendatzen duena. Bigarrenean, berriz, kualitate soila da, erdaretan: *soy joven*. Beste kontu bat da adjektibo mugatua bera subjektu denean: *gaztea beti da zoro*. Hemen *gaztea* subjektu mugatua da, eta artikulua behar du.

Hegoaldean, oro har, bereizkuntza hori galdua dugu, sekula izan badugu. Arrotz zaizkigu honelako esamoldeak: *oraindik gazte da, deabrua gaizto da, alkatearen lehengusu zen, lainoak egunsentian eder dira, gaztetan denok gara suhar*... 'Oro har', diot, zeren hegoaldean ere adin bateko gehienok kantatu izan dugu "*gazte gera gazte ta ez gaude konforme*". Eta honako esamoldeak ez zaizkigu hain arrotz: *penagarri da, bidezko da, esatea errezago da izatea baino, nahitaezko dugu, nori ez zaio gustuko, gosearekin edozer da gozo, indartsu gara eta indartsu gatoz, haurrak beti dira maitagarri*... Batez ere adjektibo atzizkidunekin normalago egiten zaigu egitura hori. Edo izenekin: *noiz ikasiko duzu gizon izaten, adjektiboa atributu denean, edandakoan denok gara zahagi, haurtxoak lotan aingeruago dira*...

*Izan* aditzaren esanahi anizkoitzak ere (*izan, egon, ukan*...) lagun dezake belarria gutxiago mintzen. *Indartsu naiz* izan daiteke: *indartsu naiz* edo *indartsu nago*. Hala ere, hegoaldeko belarri gehienei, mila azalpen eman arren, *gaizto naiz, polit zara, gazte zarete* eta gisakoak aldrebes egingo zaizkie. Zer egin? Ni neu, ahal den neurrian, beti bereizkuntzaren alde. Analogiei, pobrekuntzarantz barik, aberaskuntzarantz tiratzearen alde, gero behar diren edo komeni diren salbuespen guztiak onartzeko bada ere. Oro har, *gaztea dago* eta *gazte dago* bezala, *gaztea naiz* eta *gazte naiz* ere normal bereizi ahal izatea galtzen utzi ezineko aberastasun bat dela uste dut. Euskara batuak kalitateari hobeto eusten dioten euskaldunen ereduak zabaltzen saiatu behar du, ahalik hizkuntzarik aberatsena osatu nahi bada.





## *Hizkien ezabatzea, bokalena batez ere*

Euskarak badu berezitasun bat, inguruko hizkuntzetan apenas sumatzen dena. Hizkiak (bokalak, batez ere) igarri gabe aldatzen edo ezabatzen zaizkigu, eta ez aho hizkeran gertatu ohi den laburtze edo jate-fenomenoagatik, hizkuntzaren beraren legeengatik baizik. Batez ere, hitz-elkarketan gertatzen da hori. Adibidez: *basapiztia, etxabizitza, artaburu, astakirten, besamotz, oilategi*, eta abar. Hauetan, *baso, etxe, arto, asto, beso, oilo* hitzen azken bokala A bilakatu da. Edo hitz beraren aldaerak, hizki ezberdinez osatuak: *erten-irten-urten, atera-etara-atara, landara-landare, laba-labe, bage-baga-gabe, haga-hage, bara-bare, gazta-gaztae-gaztai-gazna, ardo-ardao-arno, tximeleta-mitxeleta-mitxoleta, barri-berri, mota-moeta-mueta, ibili-ebili, kusi-ekusi-ikusi, hatx-haitz, bakoitx-bakoitz, soro-solo, zoru-zolu, etzan-etzun-etxun-itxun, itxaron-itxoin-itxain-itxon*...

Beste batzuetan, ezabatu egingo da: *etxalde, errekarte, elizondo, gerizpe, aitamak, udazken, mugarri, biderdi, mendate*... Hauetan, lehen hitzaren azken bokala galdu egiten da: *etx, errek, eliz, geriz, ait, ud, mug, bid, mend.*

Beste batzuetan, aldatze-ezabatzeak batera gertatzen dira: *ogiordu-otordu, ogigin-okin, begiule-betule, begiondo-betondo, euribera-eulbera, saguandre-satandre, garisoro-galsoro, haizkoragin-haizkolgin, ataributu-atalburu*... Hemen, hizki batzuk galdu eta beste batzuk aldatu egin dira.

Bokalekin ez ezik, kontsonanteekin ere aldakuntza ugari gertatu ohi da: *hiztun, ikastun, haxpe, zuhaizti, ekaizte, boskarren*... Hauetan, hitza edo atzizkia edo biak aldatu dira. Berdin aditzek funtzio ezberdinetan hartzen dituzten forma ezberdinak: *sinetsi-sinets-sinest, hautsi-hauts-haust, ikusi-ikus, igorri-igor, lotu-lot*...

Gero, zer esanik ere ez, kontsonante bat bere kide bigunera aldatuz sortzen diren efektuak, hala nola bustidurak eta afrikazioak: *gizon-gixon, bista-bixta, mozkor-moxkor, zakur-xakur-txakur-tzakur, ikutu-ikuttu, puntu-punttu, nimino-ñimiño, bero-bello, gozo-goxo, zuri-xuri-txuri, zintzo-txintxo, suabe-xuabe, hezgaitz-hezkaitz, sudurzulo- sudurtzulo*...

Hizkien aldatze-ezabatze fenomeno hau hain ugaria da, ezen hemen

aipamen batzuk besterik ez dut egingo, orain -eta geroagoko beste atal batzuetan- aterako diren ondorio batzuen oinarri gisan. Hain berezitasun garrantzitsu honek merezi du bere eragina analogiaz gehiago zabaltzen utz diezaiogun.

Atera dezagun lehen ondorioa. Badakit ondoren esango dudanak fizkio itxura gehiago duela, aurrera irteteko probabilitatea baino. Jaurti egingo dut, hala ere, eta ziur nago euskaldun exotiko bat baino gehiagori tentagarri iruditukko zaiola.

Hitz-elkartzeen osaera horri jarraituz, beraz, bi hitzen artean elkarrekiko erlazio bat dagoenean –genitibozkoa, gehienean–, lehen hitzaren bokala ezabatzea normala da: *natur legea, kultur mailan, heriotz orduan, etor txartela, eror legea, filosofi arloa, ekonomi arazoak*... Normala, baina ez orokorra. Salbuespena, areago. Hitz batzuetan ondo badago, zergatik ez analogia beste hitz batzuetara zabaldu? *Natura, kultura, itxura, figura, lilura, estruktura*... *Natur legea* eta *kultur maila* bezala, zergatik ez *itxur legea, figur lana, lilur begiak, estruktur legea*? Hor dago lehendik ere *itxurga*. Eta zergatik ez *DURA-TURA* atzizkidunak ere? *Tristur egunak, egitur lanak, deitur zerrenda*... Eta, oro har, A bokalez amaitzen diren guztiak: *musik astea, pirat eskola, profet hitza, ermit ingurua, epok auzia, turut jolea, inkest arauak, protest eguna, salment araua, program diskurtsoa, aduan legeak, morfin kopurua, doktrin auzia, fortun bidea, kandel argia, okel usaina, eskol egunak, kamamil ura, tipul korda, matrikul zenbakia, gitar jolea, kalabaz ontzia, enpres legea, eliz deia, dibis trukea, arros eskaintza, zalantz ordua, arrantz arauak, segurantz auzia, hizkuntz arazoa, hobekuntz planak*... Gehiegi tiraturik, artifiziosegi eman badezake ere, baliabide honi ikusten diodan abantaila nagusia da oso argi adieraziko lukeela euskarak hain berea eta hain etengabea duen bi hitzen arteko lotura.

Zerrenda honetan batzuek beste batzuek baino naturalago dirudite, nahiz eta, agian, inoiz ez ikusi horrela. Joera hau aurrera eramateko, zenbait puntu gogoan eduki beharko da, jakina. Adibidez, R azken hizkitzat gelditzean, bigun ahozkatu beharko da, hurrengo hitza bokalez hasten bada, eta bera biguna bada: *tristuregunak, liluritzak*, baina *gitarrariak* (gitar-hariak).





Lehen hitza bi silabakoa denean, azken bokala jateak silaba bakarrean utziko du, gehienean. Laburtzeak efektu txarra eragin dezake, ekibokoa sortaraziz, edo berez laburra den hitza txakilegi utziz: *az arloa, plaz ingurua, ger legea*, nahiz eta hauek ere hitz elkartuetan hala jokatu: *plazondo, gerroste*, eta abar. Euskaldun askok bi silabako hitzei oso natural jaten die bokala deklinabidean: *lotsarik-lotsik, boltsarik-boltsik, famarik-famik, aitarik-aitik, amarik-amik, gauzarik- gauzik, gerrarik-gerrik, kakarik-kakik, galtzarik-galtzik, betarik-betik, motarik-motik*... Ez gara, beraz lege, arrotzik asmatzen ari.

Euskarak apenas daukan b, d, g, m kontsonantez amaitzen den hitzik. Orduan, azken bokala ezabatuz gero, hitz askok amai arraroa luke: *baba-bab, balada-balad, arreba-arreb, muga-mug, fama-fam*, eta abar. Dena dela, eragozpen hori belarrirako baino begirako gehiago litzateke. *Arreborde* edo *mugetxe* nahiz *arreb orde* edo *mug etxe* ikusi, esateko biak berdinak lirateke.

Hori baino koska handiagoa litzateke hurrengo hitza ere kontsonantez hasteak ekar lezakeen kakofonia edo euskarari arrotz zaion efektua. Esaterako, *arreba* eta *mota* elkarturik, hitz bakarra ezingo litzateke *arrebmota* izan. Eta beste koska batzuk ere egongo dira, noski, baina ez naiz eragozpenak errefutatzen hasiko, planteatzen dena bultzagarri izan litekeen jakin aurretik.

Eta A bokalaz esana zergatik ez beste bokal guztietara hedatu? Hitz elkartuetan, bokal guztiak lege orokor berdinean daude.

E: *Etxondo, errepide, atoste, urtaro, abeltegi, umaldi, konterri, bidarte*...

I: *Bekain, azaro, betoker, mendarte, artalde, herkide, bazkalondo, izerbera, iturgin*...

O: *Mandetxe, asterri, lepazur, gorrotontzi-gorrotuntzi, kanparto*...

U: *Burmuin, juderri, satarte, satitsu, oinaztarri, bekatari, ostatetxe*...

Hauek honela, bokal guztiekin berdintsu joka genezake: *kronlek aroan, garrot legea, uhart itxura, gizart arazoak, kazik eskua, tramit bidean irrat saioa, ebak unea, tximini bidea, mandeul botika, uztar legea, neur kordela, itur ura, inur zuloa, tabak urtea, panflet orriak, intsekt izenak, ijit ohiturak, pilot kabina, merkat arauak, medik aholkua, inbut legea, ganbel itxura, kontseil bilera, kalkul taulak, progres legea...*

Batzuetan, euskarak bokal bat gehitzen dio beste hizkuntzek hain gabe hartu duten hitzari, batez ere R kontsonantez amaituei: *amore, zapore, kolore, dolore, dotore, errektore, umore...* edo *tore* atzizkia: *salbatore, direktore,* eta abar. Hemen latinaren ablatibotik hartzen du hitza (ala akusatibotik, -m erorita?), italierak bezala: *color-coloris... colore,* nahiz eta gero *kolorga* sortu. Edo *arbor* latin hitzetik *arbola.* Argi dago euskararen jite hori errespetatu beharra dagoela.

Honekin guztiarekin, xehetasunak tematzen hasi gabe, hiru gauza nabarmendu nahi ditut. Batetik, euskal hizkiak, bokalak batez ere, ez dira elementu mekanikoak, izaki biziak baizik. Noiznahi agertzen, noiznahi ezabatzen, noiznahi aldatzen, hitz batez noiznahi mugitzen zaizkizu, bizidunak bailiran. Nahiz eta mugiera horrek bere legeak ukan, hain da fenomeno orokorra eta ugaria, ezen gure hizkuntzaren berezitasun nagusietako bat osatzen du.

Bestetik, fenomeno hori, batez ere, hitz-elkarketak eragiten du. Horixe da euskal egiturarik funtsezkoenetakoa. Elkarrekin halako dependentzia-erlazio bat dagoenean gertatzen da hitz-elkarketa. Batzuetan, oinarrian izandako dependentzia ezabaturik, hitz bakar bihurtzen dira, elipsi baten bidez. Inbidia esan nahi duen *bekaitz* hitzean nekez ohartuko gara bi hitz daudela: *begi* eta *gaitz.* Sarritan, bi osagaiak oso bistan daude: *udaberri, udazken, artaburu,* eta abar. Baina *udaberri, udazken* ez dira udaren beraren zerbait, udaren aurreko eta udaren ondoko urtaroak baizik. Bi hitz elkartu horiek elkarren baturaz beste zerbait adieraztera iragan dira. Aita Villasantek "composición impropiamente dicha" deitzen zuen horixe da gure lexikoaren iturburu nagusietako bat.

Azkenik, hitz bakarrean fusionatu eta kontzeptu berria sortu beharrean, sarritan, bi hitzen erlazio gisan gelditzen dira. *Uda kolorea,*





*udazken kutsua, negu antza, udaberri usaina...* Biko horietan, hitz bakoitzak bere independentzia dauka, baina bien artean erlazio bat ezarri da. Hauxe da euskal egiturarik behinenetakoa, zeina estutzetik datorren, hain zuzen, aurreko elkarketa kasua. Biak, funtsean, gauza bera dira, edo gutxienez, txanpon beraren bi aldeak.

Orduan, ondorio gisan atera nahi dudana da zergatik ez garen baliatuko hitz elkartuen bokal jokoaz, hitzak berjabe, baina elkarrekiko erlazioan doazenean ere. Horrek, laburtasunaz eta bizitasunaz gainera, argitasun handia lekarke, testu idatzian, batik bat. Aipatu egiturarik funtsezkoenetakoa (bi hitzen arteko erlazio edo elkar-lotura estua) era zehatz eta nabarian markatuko luke. Hizkuntzak berak hain ozenki iradokitzen digun ahalbide hori ez garatzea galera tamalgarritzat joko nuke. Horretan, Euskaltzaindiak markatu duen irizpideari oso restriktibo, salbuespen soileko deritzot. Oso hitz bakanetan bakarrik onartzen du A bokala ezabatzea, eta inoiz ere ez beste bokaletan. Abiatua zen bidea, luzatu beharrean, moztu egin du. Orduan, sarritan, erlazioa ilun edo ustez ez hain argi gelditzen zaigunean, hor ibiltzen gara marraren baliabide gogaikarria erabili ala ez, dudan, bokal baten ezabatzeak argiago eta laburrago utziko lukeena lortzeko.

Beste ondorio bat hitzen amaia litzateke. Euskaraz honelako hitzak ez dira bat ere arrotz: *galant, berant, ausart, enbat, dukat, prest, laket, paret, taket, kisket, ganibet, txolet, puntzet, polit, gonbit, gogait, kokot, konpot, zerrot, axut, zurrut...* Sarritan nahasten diren *prest* eta *prestu* oso hitz ezberdinak dira, bata adberbioa, gertu edo zerbaiterako puntuan esan nahi duena, eta bestea adjektiboa, zintzo, leial, hitzeko esan nahi duena. Besteetan, azken bokal gabeko formak nahiago ditut: *paret, kisket, gonbit, kokot, zerrot, konpot...* eta ez *pareta, kiskete, gonbite, kokote, zerrote, konpota...*

Bada beste zenbait hitz ere: *xarmant, berant, balent, perfet, sekret, present, kontent, kontzient...* Hemen hitz zerrenda luzea aurkituko dugu, tartean atzizki garrantzitsuak direla: *inportant, distirant, diferent, president, konplement, pazient, inozent...* edo *perfekt, sekret, diskret, konkret, korrekt, konplet, sujet, onest, modest...*

IA diptongoz amaitzen diren hitzak ere ehundaka dira: *egia, feria, premia, animalia, familia... komedia, tragedia, parodia... harmonia, malenkonia, sintonia... teoria, historia, kategoria... biologia, filologia, astrologia... filosofia, teosofia... geografia, ortografia... alergia, energia..., monogamia, poligamia... miseria, histeria...* Berdin zenbait atzizki ere: *lapurreria, litxarreria, mozkorreria, lukurreria, ahuleria... gaiztakeria, erdalkeria, zabarkeria, ustelkeria, emekeria... apainduria, jakinduria..., gabezia, ahulezia, polizia, justizia, demokrazia... fantasia, eskasia, amnesia..., inportantzia, anbulantzia, herentzia, probintzia, denuntzia...*

Halaber, –SO atzizkidunak ere: *amoroso, grazioso, glorioso, misterioso, kurioso, temoso, airoso, plantoso, artoso...* Hemen ere, euskarak tradizio handiko ditu *amoros, lorios, airos...*

Ez naiz sartuko hitz hauek osotasun horretan tradizio gehiago daukaten ala ez, zuzenagoak diren ala ez. Euskaltzaindiak hala erabakia dauka, eta ez daukat inolako koskarik araua onartzeko. Baina aurrerapena eta abantaila besterantz izango zela uste dut. Eta ez zatekeen arbitrarioa izango, azken bokal hori ezabatzea ere oso tradizio handia eta naturala baita euskaldun askorengan. Mailegu hitzei bertsio propioa emateak, batez ere hain gainean daukagun gaztelaniaren eredutik aldentzen denean, barneratze prozesua sendotu egiten duela dirudi, eta, oro har, nahiago dut barneratze garatuagoei jarraitu. Eta, bide batez, frantsesaren eta ingelesaren eredu europarragora hurbildu: *biologie, tragedie, harmonie / biology, tragedy, harmony*. Frantsesak azken bokala idazten du, aldaturik, baina ez du ahozkatzen. Euskarak, tradizio literario agian finkoagoei muzin egin gabe, batzuetan, abantailei ere begiratu behar lieke, normalkuntza aberatsago baten alde.

Ez dago haserretu beharrik, aukeran utzi baizik. Ez al da, kasu askotan, "erabilerak erabaki beza" espiritua aldarrikatzen? Hitz hauek hiztegian honela jar daitezke: *konkret(u), sekret(u), kontzient(e), president(e), inportant(e)... histori(a), energi(a), lapurreri(a), ustelkeri(a), jakinduri(a), polizi(a), probintzi(a)... amoros(o), glorios(o), airos(o), misterios(o)...* IA amaieradun hitzak I egiteak (*histori, probintzi* eta abar) abantaila bat baluke: A bokala agertzen denean, artikulu mugatzailea dela garbi legoke. Beste anitz puntutan bezala, ziur nago aukera bikoitz eta





lasai onartu horrek euskararen eta euskaldunen batasuna, ahuldu barik, indartu egingo lukeela. Aitor dut, neu arauemaile jarrita, zenbait konkrezio zer bortxatutzat joko nituzkeela, baina ez daukat dudarik euskararen jiteak hain bere duen bokal-jokoak eskain ditzakeen abantailak baliatu gabe uztea ere penagarri dela.

## *R = ER beti?*

Euskaraz R hizkiz hasten diren hitz guztiak ER bilakatzen direla esan ohi da beti. *Roma, rebelarse, rendirse, repasar... = Erroma, errebelatu, errenditu, errepasatu...* Baita AR ere: *errosario-arrosario, errazoi-arrazoi, erratoi-arratoi...* Zergatik gertatu da protesi bokaliko hori? Euskararen sen bereziren batek eskaturik, ala, beste gabe, euskaldunek hizki hori hitzen hasieran ahozkatzeko zeukaten zailtasun edo alferkeria bategatik? Ala erosoago eta eufonikoago zitzaielako, soilik, hizkuntzaren sena nahiko materiala izan ohi baita sarritan?

F hizkiaz ere ez gara ika-mika gutxi ukan zahar. Euskaraz hizki hori ez zela existitzen edo ez zela existitu behar defendatzen zuen askok. Oraindik ere horixe pentsatuko dute bizirik darraitenek. Azkueri nonbait irakurria diot berak euskaldun askorengan konprobatu zuela F-rik ezin zutela ahozkatu. Hartara jarri, eta inola ere ezin. Erdaldun eta erdal-euskaldun askok TZ ahozkatu ezin duten legez. *Abertxaleak.*

Delako arrazoia dela, tradizio nagusia R = ER/AR izan dela ez dago dudarik. Baina tradizio horri sistematikoki eusten jarraitu behar al dugu? Noiz arte eta noraino? Izen berezietan onartua da dagoeneko. Gaur barregarria litzateke *Rommel, Racine, Rossini... Errommel, Erracine, Errosini...* idaztea. Hitzen hasieran, hizki hori euskaraz ez dela existitzen legetzat joez gero, hala beharko luke. Ez gara irakurri eta entzun gabeak honako pertsona-izenak: *Erromulo, Erromeo eta Julieta, Errodriguez, Errodrigo, Errafael, Erravel, Errikardo, Errembrandt, Erroberto, Errolan, Errubens...* Hauetan joera nahikoa zuzenduda. Edo leku-izenak: *Erribera, Errotterdam, Erreno, Errontegi...* Leku-izenotan ere, *Erroma, Erribera, Errusia* bezalako oso tradizio sendoko zenbaitetan izan ezik, inguruko hizkuntzen hasiera-legea onartua dago.

Izen arruntetan, ostera, hor darraigu sistematikoki aplikatzen, edo zeinetan aplikatu eta zeinetan ez, zalantzan. Horrela, gehienak gaur ere honela doaz: *errima, erritmo, arraro, erritu, errobot*... Araua sistematikoki aplikatzeari oker deritzot. Oro har, tradizio finkatua daukaten hitzetan izan ezik, arau hori beste hizkuntzen joerara homologatu behar dela uste dut. Non bata amaitzen eta non bestea hasten den zehaztea, zenbait kasutan, zaila izan liteke, noski, ez baita gutxi gorabeherako kontua, hitz bakoitzean banan-banan erabaki beharrekoa baizik.

Niretzat, hitz hauek honela behar lukete: *radar, ralenti, rally, radio, radiadore, radial, radikal, razionalismo, requiem, radioaktibo, razista, radioaktibitate, radiograma, retina, rutina, robot, ron, rotazio, rural*, eta abar. Ez naiz hasiko hitz bakoitzagatik adarrak hausten, esan bezala, banaka erabaki behar baitira, baina joera garbi ikusten dut. Nahiko arlote iruditzen zaizkit *errobot, errekord, errural, erritmo, errotazio, erradiadore, erradikal, erradar*, eta horrelakoak. Areago, aurrerantzean etorriko direnekin.

Zenbait hitzetan, hasierako Re Er bihurtzen da, hots, *Erre* = *Er*. Hala: *erlatibo, erlatititate, erlatibismo, erlax, erlazio, erliebe, erlijio, erlikia, erloju, erluktantzia, erlebu*, eta abar. Ohartzekoa da tarteko E jateko efektu laburtzaile hori hurrengo L kontsonanteak daragiela. Beste kontsonante batzuetara ere zabal al liteke analogiaz?

Hitz askotan RE aurrizkia litzateke: *erre-pasatu, erre-postu, erre-presentatu, erre-sonantzia, erre-soluzio, erre-teila, erre-aktibo, erre-(e)boluzio, erre-akzio, erre-zitatu*... Hemen, bistan denez, aurrizkiari trataera orokor bera eman beharko zaio. Aurrizki-atzizkien atalean ekingo diogu.

Hitzen grafian, badira kontu luzeak, baina, atal hau amaitzeko, aipa dezadan beste bat. *Geologia, logika, magia, legio, legenda, arpegio*, eta gisako zerrenda luzea grafia horregaz onartu eta erabaki ondoren, ez dut ikusten, beste honakoetan, zergatik jarraitu behar zaion gaztelaniaz ahoskatzen den erara idazteari: *erlijio, imajinatu, ebanjelio, jeneral, birjina*, eta abar. Hauetan eta beste hizki batzuetan ere, arau orokortzat jarriko nuke europar eredu komunera makurtzea, ahoskera, beharbada, libre utzita. Utz dezagun horretan, auzi hori ez baitzait lan honetarako garrantzi handiegiko iruditzen.





## *Ue, ie = o, e*

Diptongo hauek gaztelaniazko hitz askotan ageri dira. Latinezko *terra, tempus, centum, semper* eta ehundaka gehiago, gaztelaniaz *tierra, tiempo, ciento, siempre*, eta abar dira. Berdin *morte, corno, bono* eta abar, gaztelaniaz *muerte, cuerno, bueno*, eta hala. Gaztelaniaren berezitasun exklusiboa da hori. Beste hizkuntza latindarrek, eta gutxiago ingelesak eta honen kideek, ez dute bihurtze hori egiten. Euskara ere argi dago ez dabilela eredu horretatik: *kontu, sentimendu, zoru-zolu, denda, tentu, denbora, koba, korda, gorputz, zeru, dolu, festa-besta, foru, ortu, joku, zorte*, eta abar.

Beraz, euskararen jitetik guztiz at daude *muestra, suelto, entierro, entzierro, errepuesto* eta gisako hitz diptongodunak. Nahiz eta, agian, gaztelaniatik hartuak izan, gutxienez, *mostra, solte, enterru, entzerru, errepostu* behar dute.

Badira oso zabalpen luze eta zaharreko hitzak, *buelta, fuerte*, eta abar. Hauek ere *bolta* eta *forte* gisa erabiltzea ez nuke pedanteriatzat joko. *Forte* hori bestela ere badugu euskaraz, *bortitz* forman. Latinezko *fortis-forte* (biak hitz beraren deklinabideko kasuak) euskaraz *bortitz* eta *forte* lirateke, hau gaztelaniatik *fuerte* gisa hartua bada ere. *Bortxa* izena ere tartekoa da. Salbuespen batek edo bestek ez du inon minik egiten, baina joera guztia gaztelaniarantz lerratzea degradaziotzat jo behar da.

# ADITZAREN FANTASIA HEROIKOA

"Jo diagu haitza, Santxo! Ez Eliza, baizik Euskal Aditza".

Lan honen lehen paragrafoan nioen: "Nago euskararen arazo nagusia euskara bera dela. Hots, euskara deritzon tresna". Orain, bigarren baieztapena menturatzen dut: euskararen arazo nagusia bere aditza da. Nork esango zukeen, gure hizkuntzaren mirarírik handienetakotzat geneukana! Egia da, lan honetan, egiturak eta lexikoa bezalako arazo lodiak planteatzen direla. Kasurik gehienetan, soluzioak ematen saiatzen naiz. Eta horietako asko garaile irtengo direla uste dut. Larriena izanik ere, arazo batentzat soluzioa posible bada, ez da hain arazo larria. Aditzaren kasuan, arazoaren alderik larriena da oso soluzio zaila daukala. Niretzat, oraingoz, ezinezkoa. Horregatik, auzia, oro har, eta bere zenbait alde zehatz, planteatu besterik ezin ditut egin, etsipenez.

Bizi guztia daramat hizkuntzaren inguruko jardunetan, eta beti, beti, aditzarekin topo egiten dut. Bertsogintzan, bat-batekoan zein jarrietan, oztoporik handiena aditzean aurkitu dut. Egin ditudan hainbat musika-

letratan, eta areago, itzultzea tokatu zaidanetan, aditzean aurkitu dut oztopo gaindiezina. Egokitzapen lanean egin ditudan urteetan, filmetan batez ere, aditza izan dut oztopo amesgaizti. Arrazoia argia zen: euskal aditzaren luzera. Denborak eta neurriak agintzen duten jardun guztietan (kanta, film, elkarrizketa, bertso, poema, iragarki, slogan, kartel eta abar), inguruko hizkuntzekiko desabantaila etsigarrian aurkitzen gara. Luzera bakarrik balitz, gaitz erdi. Okerrena, beharbada, bere zailtasun labirintikoa da. Gure aditz honegaz ezin dugu izenburuak dioen hizkuntza 'lehiakorra' burutu. Edo elipsi sistematikora jo behar da, hizkuntza artifizial eta primitibo bat sortuz, edo, bestela, desabantaila etengabean aurkitzen gara.

Egoera, objektiboki ikusita eta hotzean neurtuta, larria da. Gure aditzaren erabilera praktikoaren proportzio exaktoak neurtzea interesgarri litzateke, baina, handi-handika, honako ebaluaketa egin genezake. Aditzaren %50a inoiz ez da erabiltzen. Geratzen den 50aren erdia (osoaren %25a) oso gutxitan eta oso gutxik darabil. Erabiltzen den %25aren erdia gehienek gaizki darabilte. Eta, azkenik, ondo erabiltzen den proportzio txiki hori ere erosio-arrisku etengabean bizi da. Ezin dugu lortu euskaldun berriek aditzaren parte txiki bat menpera dezaten. Ezin dugu lortu euskaldun zaharrok aditzaren parte txiki horri korrekzio sanoan eusterik. Orduan, galdera bikoitza da. Alde batetik, zertarako dira sekula erabiliko ez ditugun aditz-paradigma amaigabe horiek, ikasleen eta hiztunen buruak alferrik apurtzeko ez bada? Bestetik, zer egin genezake nahitaez erabili beharrekoak diren, baina zuzen eta erraz erabiltzerik lortu ezin dugun beste aditz-forma amaigabe horiekin? 'Ezin lortze' horretan ez dut, noski, betiko adituen edo saiatuen multzo konplazent hori jotzen. Hizkuntza normal eta normalki 'leihakor' batean, hiztunek masiboki eta erraz menperatzeko modukoa izan behar du aditzak. Ez daiteke izan hizkuntza baten bizkarrezurra den aditzaren menperakuntza mirari pro(me)teikotzat hautematea. Begiratzen zaion tokitik begiratu, euskal aditza da euskararen problemarik larrienetakoa.

Eta larriena da (hau ahalik era ezkutuenean esango dut) ez zaiola irtenbiderik ikusten. Irtenbide errazik, behintzat. Oso hitz inpopular bat erabilita, euskal aditzak errekonbertsio urgentea behar du. Baina ez dakust errekonbertsio hori nola egin daitekeen. Eta ez dakust, ez hainbeste, hizkuntzaren barne izaeragatik, bere jabeengatik baizik. Argi esanda, euskaldunengatik.





Horregatik, ondorengo atal luze guztian azalduko dena ariketa ludiko bat bezala aurkezten dut. Auzi batzuk errealak eta errealistak izan daitezke. Funts gabeko jolasak ez ditut maite. Beste auzi batzuk zentzuzkoak, baina ezinezkoak izango dira. Zenbaitzuk, azkenik, kimerikoak ere bai. Proposamentzat baino gehiago, har ezazue, beraz, kapituluaren izenburuak zioen moduan: *Aditzaren fantasia heroikoa*. Izan ere, izenburua ohoratzeko, fantasia batzuk hariltzeko gozamenari ezin nion utzi. Badaezpada abisatzen dut, jakintsuak baino ugariago ohi diren eruditoetako norbait gezi akademiko guztiak tiratzera beharturik aurki ez dadin. Saiatzen naiz, nolanahi, fantasiok oinarri zerbaitez aurkezten, eruditoei ere gezientzat itu bila aritzeko dibertsiorik ez kentzearren.

Abiatzeko, jar dezagun testu bat. Nire eskutik iragan diren ehundaka adibideetako bat.

*- Non bizi zarete?*
*- Bizi ginen. Denbora da etxebizitzaz aldatu nintzela. Orain bakarrik bizi naiz.*
*- Ba, ez zenidan abisatu.*
*- Jakingo zenuela uste nuen.*
*- Nola jakin behar nuen, inork ezer esaten ez bazidan? Ongi, utz dezagun iragana eta hitz egin dezagun oraingoaz. Zer moduz zabiltza?*
*- Tiratzen ari naizela uste dut, eta horrekin konformatzen naiz.*
*- Egunotako batean elkar ikusi behar dugu. Elkarrekin bazkalduko genuke, eta gauza askotaz mintzatuko ginateke. Ondo iruditzen al zaizu?*
*- Ez zait gaizki iruditzen.*
*- Zein egun jarriko dugu?*
*- Ondo badatorkizu, biharkoa bera, baina nahiago nuke afaltzeko izan dadin. Gaua gehiago gustatzen zait.*
*- Bihar hots egingo dizut eta esango dizut non eta noiz. Lehenbizi, beste konpromiso bat desegin behar dut, baina eguerdira arte ikusiko ez ditudanez gero...*
*- Nahi baduzu, beste egun baterako geratuko gara.*
*- Ez, ez! Garrantzi gabeko konpromisoa da. Nire ilusioa zurekin hitz egitea da.*

Biharamonean, telefono kabina baten ondoan:

*- Kaixo! Oso ondo aurkitzen zaitut.*
*- Eskerrik asko. Zeuk ere ez duzu desentonatzen.*

*- Horrek esan nahi du afari interesgarria izan daitekeela.*
*- Musu bat ematen utziko al didazu?*
*- Ez dut ulertzen zergatik baimena eskatzen duzun.*
*- Badaezpada. Ez zait gustatzen zirkunstantziak aprobetxatzen ditudala esan diezadaten.*
*- Bai biribil atera zaizula!*
*- Ez duzu pentsatuko entseatu egin dudala, ezta?*
*- Emaidazu musua eta utz diezaiogun lelokeriak esateari.*
*- Bss! Bss! Zein jatetxetara joatea gustatuko litzaizuke?*
*- Portuan merke eta ondo ematen omen dute.*
*- Inork ez al dizu esan non ematen duten garesti eta gaizki?*
*- Zuen etxean?*
*- Oh! Nitaz burlatzen ari al zara? Ala, agian, gure etxera igotzea atsegin litzaizukeela sugeritzen ari al zara?*
*- Ez afal aurretik. Goazen portura. Toki hori oso gogoko dut.*
*- Berorrek agintzen duen bezala, andere. Zerbitzari honek Berorren Goitasunari nola pozik gehien eman diezaiokeen bakarrik pentsatzen du.*

Jatetxean sartu ziren eta gizonak esan zuen:

*- Eseriko al gara hementxe?*
*- Nahi duzun tokian.*
*- Arrazoia zeneukan. Toki xarmagarria da.*
*- Banekien gustatuko zitzaizuna. Normalean, jendea ondo gidatzen asmatzen dut.*
*- Jendetzat jotzen al nauzu?*
*- Zeuk nahi izan zenuen. Nik uste nuen jende baino zerbait gehiago izango zinela, baina joan egin zinen. Nire aholkuak jarraitu izan bazenitu, agian, gaur biok zoriontsuago izango ginateke.*
*- Nork segurtatzen dit zurekin ez zitzaidala gauza bera gertatuko?*
*- Kontaidazu zer gertatu zaizun.*
*- Lodiena badakizu. Neskatxo batez gustatu nintzen, ezkondu ginen, bi seme-alaba etorri ziren, problemak hasi ziren, ia elkar gorrotatzeraino iritsi ginen, eta azkenean, dibortziatu egin ginen.*

Orain itzul dezagun erdarara.

- ¿Dónde vivís?





- Vivíamos. Hace tiempo que cambié de piso. Ahora vivo solo.
- Pues no me avisaste.
- Creía que lo sabrías.
- ¿Cómo iba a saberlo, si nadie me decía nada? Bien, dejemos el pasado y hablemos del presente. ¿Qué tal andas?
- Creo que voy tirando, y con eso me conformo.
- Tenemos que vernos un día de éstos. Comeríamos juntos y hablaríamos de muchas cosas. ¿Te parece bien?
- No me parece mal.
- ¿Qué día ponemos?
- Si te viene bien, mañana mismo, pero preferiría que fuera para cenar. La noche me gusta más.
- Te llamo mañana y te digo dónde y cuándo. Primero tengo que anular un compromiso, pero como no los veré hasta el mediodía...
- Si quieres, quedamos para otro día.
- ¡No, no! Es un compromiso sin importancia. Mi ilusión es hablar contigo.

Al día siguiente, junto a una cabina telefónica:

- ¡Hola! Te veo muy bien.
- Gracias. Tú tampoco desentonas.
- Eso significa que puede ser una cena interesante.
- ¿Me dejas darte un beso?
- No entiendo por qué pides permiso.
- Por si acaso. No me gusta que me digan que me aprovecho de las circunstancias.
- ¡Qué redondo te ha salido!
- No pensarás que lo he ensayado, ¿verdad?
- Bésame y dejemos de decir tonterías.
- Bss! Bss! ¿A qué restaurante te gustaría ir?
- Dicen que en el puerto se come barato y bien.
- ¿Nadie te ha dicho dónde se come caro y mal?
- ¿En tu casa?
- ¡Oh! ¿Te burlas de mí? ¿O tal vez sugieres que te encantaría subir a mi casa?
- No antes de cenar. Vamos al puerto. Me gusta mucho ese lugar.
- Cómo mande usted, señora. Este siervo solo piensa en cómo complacer mejor a Su Alteza.

Entraron en el restaurante y el hombre dijo:

- ¿Nos sentamos aquí mismo?
- Donde quieras.
- Tenías razón. Es un lugar encantador.
- Sabía que te gustaría. Normalmente acierto a conducir bien a la gente.
- ¿Me consideras gente?
- Tú lo quisiste. Yo creía que serías algo más que gente, pero te fuiste. Si hubieras seguido mis consejos, tal vez hoy seríamos más felices los dos.
- ¿Quién me asegura que contigo no me habría sucedido lo mismo?
- Cuéntame lo que te pasó.
- Lo más gordo ya lo sabes. Me encariñé de una chiquita, nos casamos, vinieron dos hijos, comenzaron los problemas, llegamos casi a odiarnos, y por fin nos divorciamos.

Euskarazko testuan 880 silaba zenbatu ditut. Erdarazkoan, 656. Bietan egin beharreko sinalefa guztiak eginda atera ditut kopuruak. Zenbakiak ehunekora ekarrita, 100-75 proportzioa irteten da. Horrek esan nahi du erdarazko testua esaten hiru ordu laurden behar duguna, euskarazkoan ordubete beharko genukeela, abiadura berdinean.

Badakit hizkuntza bataren eta bestearen esakuntzak ezin direla mekanikoki konparatu, baina, gutxi gorabehera, proportzio horretatik eskapatzerik ez dago. Konparazioa hizkuntza bakoitzaren abioaren eta kadentzien arabera zorroztuko bagenu, seguruenik, aldea erdararen alde handituko litzateke.

Alde horren erantzule nagusia aditz perifrastikoa dugu. Eta zer esanik ere ez, euskaraz hain ugari diren bi elementuko aditzak direnean. *Lloras-llorabas-llorarías, respiras-respirabas-respirarías, huyes-huías-huirías...* Euskaraz: *negar egiten duzu-negar egiten zenuen-negar egingo zenuke, arnasa hartzen duzu-arnasa hartzen zenuen-arnasa hartuko zenuke, ihes egiten duzu-ihes egiten zenuen-ihes egingo zenuke...*

Testu luze eta diskurtsiboetan ez da hain nabaria izaten, aditzak beste era batera banatzen direlako. Aditz nagusi baten menpean, beste hainbat aditz etor daiteke, baina ez forma jokatu perifrastikoan, hainbat





eratara baizik: *egiten, eginik, egiteko, egitera, egitearren, eginda, egina, egitekotan, egiterako, egindakoan, egiteagatik, egitear...* Forma horiek ez dira beste hizkuntzenak baino luzeagoak, oro har.

Baina esaldi laburretan, sarritan, aditz bakarra dago, bera jokatua eta, gehienean, perifrastikoa, aditz trinkoak oso gutxi baitira. Elkarrizketak eta hizkuntza mintzatuko eredu gehienak horrelakoak dira. Irrati eta telebista hizkuntza, filmak batez ere, molde horretakoak dira. Zer esanik ere ez, komikiak, iragarkiak, sloganak, publizitatea, kartelak, eta hitzen espazioa aurreztu behar den guztiak. Prentsa idatzian oso ezberdinak dira berri-artikuluak, iritzikoak, denborapasakoak... Iritzi artikuluak diskurtsiboak eta abstraktuagoak izan daitezke, idazlearen luzigarri eta irakurle mota jakin batentzat.

Ustez, irakurleria osoari doazkionek, ordea, eta hauek dira gehienak, hizkera direktoan eta bizian joan behar dute. Eta hizkuntzaren izate nagusia alor horretantxe jokatzen da. Zientzi hizkuntza edo azalpen hizkuntza hor daude eta ezin garrantzitsuago dira, baina eguneroko solas hizkuntza oso bestelakoa da. Bertan, esaldi laburra eta pertsonala da nagusi, eta horrek, euskaraz, aditz perifrastikoa ugaritzea dakar, trinkoak hain bakanak izanik.

Irudiaren mende eta denbora jakinaren barruan sartu beharreko testuak (filmak eta beste ikus-entzunezkoak), edo espazio bati lotuak (horma iragarkiak, panelak, kartelak, eta abar) itzultzen dituztenak ondotxo ere jabetuko dira horretaz, berau baita, hain zuzen, itzultzaile-egokitzaileen koska nagusietakoa: nola laburtu eta zer kendu, beste hizkuntzen denboran eta espazioan sartzeko.

Era bat testuari abiadura handiagoa ezartzea da, azkarrago irakurtzea, alegia.

Euskaraz itzultzen hasi ziren lehen filmetan, denak audio azkarrean mintzo zirela ematen zuen. Bistan da zer gertatzen zen. Itzulpenean askoz esaldi luzeagoak ateratzen zitzaizkien, eta denbora barruan sartzeko, azkarrago esan behar. Baina hori ezin da egin, eta gutxiago originalean oso azkar hitz egiten badute, filmik gehienetan gertatzen denez. Hargatik, gero, eskrupulurik gabe, hitz eta esaldiak eliminatzen ikasi genuen. Baina beti

geratzen zaizu kezka bat (batzuetan, amorrua), lautatik bat esan gabe utzi duzula. Oraingoz ez daukagu koska horrentzat erremediorik. Sarritan hain artifizial gertatzen den elipsi etengabean jardun ezik, testua mutilatzea da aukera bakarra.

Luze-laburren alde hori nabarmentzen den beste arlo bat kantak dira. Adibideren bat probatu nahi duena has bedi edozein kanta ingeles edo frantses euskaratzen, eta ea sobratzen zaizkion silaba guztiak non sartzen dituen. Gero esango dizute itzulpen naturala itzulpen librea dela. Sarritan, libertateak zenbat ezintasun disimulatzen duen! Nire aholkulariak dio euskararen arazo bera dutela gainerako hizkuntzek ere ingelesarekiko. Neurriren batean, hala izango da, baina ez euskararen neurrian. Ingeles, frantses, katalan eta gaztelaniazko kantekin ibilia naiz, eta euskarara itzultzean, denetan aurkitu naiz edukiaren zati bat (batzuetan, zati handi bat) kanpoan utzi beharrean.

Mintza gaitezen, ba, ikasleen buruak hausten eta gero praktikan hainbeste problema sortzen duen aditzaz. Erraza balitz ere! Euskal aditza hizkera mailan, osoki eta pentsatu gabe menperatzen dutenak, zenbat ote dira euskaldun guztien artean? Dozena erdi jartzen badut, haserretu egingo zaizkit, baina badakit dozenara ez direna iristen. Eta hainbeste kosta ondoren, hor aurkitzen dugu gero bera dela diskurtsoaren lasta nagusia. Ez da, ba, gutxi mitifikatua izan! Azkenean, aditzak berak ere sinetsi egingo zuen, eta jainko txiki bihurturik, gu mortifikatuz gozatzen da.

## *Aditz transitiboak eta intransitiboak*

Hemen ez naiz sartuko, euskal aditza sailkatzeko, transitibo-intransitibo binomioa egokia den ala ez. Aditzen izaeran oker handiak zabaltzen ari dira, eta hori argitzeko, edo planteatzeko behintzat, binomioak balio dit.

Zenbait aditz transitibo ala intransitibo diren erabakitzean, tokien eta euskalkien arabera, praktika kontrajarriak dauzkagu aspaldidanik. Hona adibide batzuk: *urten-erten-irten, igo-igon, jardun-ihardun, eskapatu, saltatu, dantzatu, jolastu, gozatu... Urten dot-irten naiz, igon dot-igo naiz, jardun dut-jardun naiz, bazkaldu dut-bazkaldu naiz, eskapatu dut-eskapatu*





*naiz, saltatu nuen-saltatu nintzen, dantzatzen dut-dantzatzen naiz, jolasten dut-jolasten naiz, asko gozatzen dut-asko gozatzen naiz...*

Nahasmen hori, zuzendu beharrean, okertzen ari da. Hona mailegatutako aditzen zerrenda bat, hiztegian onartzekoak diren ala ez, albora utzita: *Existitu, eboluzionatu, aterrizatu, despegatu, desfilatu, borrokatu, funtzionatu, txokatu, entrenatu, erreakzionatu, progresatu, korritu, disfrutatu, eztabaidatu, ernegatu, deskantsatu, abantzatu, pasiatu, boxeatu...* eta abar eta abar.

Aspaldiko txistea da stopgile batena. "*Eramango nauzu?*" ordez, "*eramangoidazu?*" galdetzen du, eta kamioizaleak, "*bota gainera*" esanda, aurrera egiten du, mutila bide bazterrean utzita. Gaur txiste hori kontatzea alferrik da, gehienek ez baitute alderik sumatzen, 'eramangoidazu' eta gisakoak ondo daudelakoan. Gure aditz miragarria! Eman berri dugun zerrendan ere antzeko jokoa egin daiteke:

– *Zelan? – Existitzen diat – Zer existitzen duk? – Neu – Orduan, existitzen nauk.*
– *Munduak mende erdian gehiago eboluzionatu du... – Zer eboluzionatu du? – Nolako zer? Bera! – Orduan, eboluzionatu da.*
– *Bihar entrenatuko dugu – Zer entrenatuko duzue? – Geure buruak! – Orduan, entrenatuko gara.*
– *Berandu aterrizatu genuen – Zer aterrizatu zenuten? – Nolako zer? Geu! – Orduan, aterrizatu ginen.*
– *Gure etxean egunero eztabaidatzen dugu – Zer eztabaidatzen duzue? – Ezer ere ez. Edozer – "Eztabaidatzen dugu" diozu eta – Bai, ba, eztabaidan aritzen garela – Orduan, eztabaidatzen gara izango da, ezta?*
– *Horretan ederki funtzionatzen dut – Zer funtzionatzen duzu? – Zer funtzionatzen dudan? Neu, noski! – Orduan, funtzionatzen naiz, ezta?*

Azken hori, '*funtzionatu*' alegia, inoiz ez dut intransitiboan entzun. Gehienean, ez dago hitz hori euskaraz erabili beharrik: *Esto funciona. Esto no funciona. Hau badabil. Hau ez dabil. Hau ari da. Hau ez da ari.* Baina erabiltzen dudanean, neuk ere beti transitiboan darabilt, ohitura osoa horretara baitago. Beste batzuk, '*existitu*' kasu, bietara entzun ohi dira. Horrek esan nahi du oraindik badela bereizmen pixka bat. Eta pentsatzen

jarrita, nekez izango da '*existitu*' baino kontzeptu intransitiboagorik, edo transitiboa okerrago datorkionik.

Nahasmen honek baditu bere arrazoiak. Aurren aurrenik, euskararen jakite gero eta ahulagoa. Ahula aise deformatzen da indartsuaren alderantz, kasu honetan, erdal egituretarantz. Hizkuntza hauek ergatiborik ez dutenez gero, erreferentzia gabe uzten gaituzte.

Baina arrazoi nagusitzat hori jorik, badira beste arrazoi batzuk ere, justifikatzaileak ez izan arren, deformaziorantz tiratzen dutenak. Lehenik eta behin, euskaraz, aditz askok forma biak hartzen dituzte, bai transitiboa, bai intransitiboa. Eta erreflexibo inpertsonalean, denek. Honela: *sartzen dut-sartzen naiz, altxatzen dut-altxatzen naiz, aurreratzen dut-aurreratzen naiz, aldatzen dut-aldatzen naiz*... Orduan, bereizkuntzan, batetik bestera deskuidatzea ez da zaila, batez ere, erdararen eredua hobeto ezagutzen dugunean.

*Kotxe bat aurreratu dut* ondo dago kotxea hartu eta bera aurrera eraman dudanean. Kotxe bati aurrea hartu diodala esan nahi dudanean ere, balio dit, noski, baina duda orduan, *kotxe bati aurreratu natzaio* esanez argituko nuke. Ondo legoke *mutila entrenatzen dut*, baina neu banaiz entrenatua, *entrenatzen naiz* beharko du. Erdaraz *hemos adelantado a un coche, la Real entrena mañana, hemos desfilado, habeis evolucionado, despegamos en Sondika, hemos luchado, funcionamos, existo*, eta abarren lekuan esango balitz: *nos hemos adelantado a un coche, la Real se entrena mañana, nos hemos desfilado, nos hemos evolucionado, nos despegamos en Sondika, nos hemos luchado, os habeis evolucionado, nos funcionamos, me existo*, eta abar, orduan euskaraz ere ez ginateke hainbeste nahasiko. Ez da, ba, horrela, eta esaldi horiek barregarriak lirateke erdaraz.

Erdaraz, sarritan, intransitiboa ez da inondik agertzen. Hala dela jakin behar da, baina ez da adierazten. Behin *me levanto, se cayó, nos quejamos*... eta behin *desfilo, caminamos, anduvimos*... Orduan, erdara euskara baino hobeto dakienak '*comemos*' eta '*paseamos*' kategoria berean sartzeko arrisku handia dauka: *jaten dugu, pasiatzen dugu*.

Euskaraz, aditz bat bi elementuz osatzea oso egitura ugaria da:





*gorroto ukan, ari izan*, eta abar. Egitura horren sortzaile nagusietakoa '*egin*' aditza da: *salto egin, negar egin, pixa egin, barre egin, lo egin, gogor egin, eder egin, eurt egin, oihu egin, pot egin, porrot egin, aurrera egin, albora egin, zurtz egin, putz egin, ok egin, irrist egin, dzanga egin, borroka egin*... eta ehundaka.

Orduan zer gertatzen da *salto egin, oihu egin, aurrera egin, irrist egin, dzanga egin, burruka egin* horiek *saltatu, oihukatu, aurreratu, irristatu, dzangatu* bilakatzen direnean? Ba, '*egin*' aditzaren menpetasuna azpian gelditzen zaiela. Eta gaitz erdi denek berdin egingo balute. Batean *saltatu dut*, bestean *irristatu naiz*, bestean bietara, *borrokatu dut-borrokatu naiz*... Nahasmena.

Jokaera zuzenaren adibide argi bat '*lokartu*' aditza da. Berau '*loak hartu*' aditz bikoitzaren fusioa da. Beste batzuek '*lo hartu*' esango dute. Garbi dago bai *loak hartu*, bai *lo hartu* transitiboak direla. Beraz, *loak hartu nau* edo *lo hartu dut*. Batean, loak ni hartzen nau, bestean nik lo hartzen dut. Bietara lo. Hona, ordea, '*lokartu*' aditza intransitiboan jokatzen dugula: *umea lokartu da. Bart berandu lokartu nintzen*. Bikoiztasuna galdurik, unitate bakar bihurtzean, kontzeptuak agintzen du, eta horrexek erabakitzen du aditzaren izate transitiboa ala intransitiboa.

Beste arrazoi batzuk ere egongo dira nahasmen honen sortarazle. Ez diot inola ere gure aditz-jokoa erdaren arabera erabaki behar denik. Izan litezke salbuespenak, kontzeptu transitiboa edo ustez transitiboa eduki arren, intransitiboan joka daitezkeenak. Arkaismo bat, ohitura bat, oker bat, edo hizkuntzaren kapritxo soil bat aski arrazoi izan daiteke. Ez diot euskal aditzak transitibo-intransitiboetan bakarrik sailkatzekoak direnik ere. Izaera hauetaz gainera, badira aditz erreflexiboak, inpertsonalak, neutroak, laguntzaileak, eta abar. Eta asko, izaera bat baino gehiagokoak, azepzioen arabera. Baina euskaraz bi aditz-joko dauzkagu: *nor*-dunak eta *nork*-dunak. *Nor-nori* eta *nork-nori-nor*. Eta bakoitza bere tokian zalantza gabe eta zuzen jartzen jakin behar dugu.

Hori guztia praktikak erabaki dezake, noski. Bebil martxan, eta aldez geroztik ikusi zer ateratzen den. Litekeena da, eta horrelaxe gabiltza, baina ez dut uste nahasmena eta zalantza arauemale jartzea hizkuntza

baten garantia sanoegia denik. Nork eta non zehazten da aditzen izate transitiboa, intransitiboa edo dena delakoa? Hiztegian. Hala egiten dutela ikusten dut gaztelaniaz, frantsesez eta ingelesez. Euskarazkoetan ere saiatzen dira, noski. Baina horretarako, aditz bakoitzaren izaera nolakoa den argi eduki behar da, eta hor dago gure koska. Auzia ez da huskeria bat, euskararen berezitasunik handienetakoa jotzen duena baizik. Euskaraz ikasten hasten denaren lehen ezuste zail eta nagusietakoa da bi aditz-joko ikasi beharra. Bikoiztasun hori ondo zentratzen eta ordenatzen ez bada, euskal egitura berezienetako bat alteratzeko arrisku handia dator.

## *Behar, ahal, ezin, nahi-gura*

Aditz hauexek dira bakarrak (ez dut uste besterik denik), datxekien beste aditza partizipio burutuan daramatenak: *EGIN behar dut, EGIN ahal dut, ezin dut EGIN, EGIN nahi dut, EGIN gura dut*. Eta ez: *egitea behar dut, esatea nahi dut,* eta zabarkeria berri horiek. Bi esaldi horiek gramatikalak dira, noski, baina aditz modalaren subjektua eta aditz nagusiarena bat ez datozenean.

Hemen interesatzen zaigunerako, aditz horiek, gehienbat, transitiboan jokatzen dira, nahiz eta aditz intransitiboari lagundu. *Jan behar dut-joan behar dut.* Hor ez dago dudarik. Baina baita ere egia da biak bereizteak baduela uste baino tradizio zabalago eta zaharragoa. Horren arabera: *jan behar dut, jan ahal dut, ezin dut jan, jan nahi dut, jan gura dut,* baina *joan behar naiz, joan ahal naiz, ezin naiz joan, joan nahi naiz, joan gura naiz.* Forma hauek, jakina, era bakarrera, transitibora, ohituta dauden belarriei gogor egingo zaizkie, baina hori belarri problema da. Bereizten ohituta daudenei ere gogor egingo zaie ez bereiztea.

Beti transitiboan ohituta daudenek ere badituzte salbuespen garrantzitsuak. Demagun haurra sehaskan erdi zutiturik eta kanporantz erortzeko arriskuan dagoela, eta abisatzen duzu: *Eh! Haurrak sehaskatik erori behar du!* Baina gauza bera haurraren amari datiboan abisatzen badiozu, esango diozu: *Eh! Haurra sehaskatik erori behar zaizu!* Ez duzu esango: *Haurrak sehaskatik erori behar dizu.* Eta honelako adibide ugari: *Ilea erori behar zaizu. Saiatzen naiz, baina ezin zait loteriarik tokatu.*





*Kontu eta montu, esnea erre behar zaizu. Norbait derrigor etorri behar zait laguntzera. Kontuz, hi! Gurpila irten behar zaik.* Datibozko flexioetan, beraz, aditz hauek intransitiboa behar dute, beste aditza halakoa denean. Ez dago pentsatzerik ere *ileak erori behar dizu* bezalakorik, *ileak erori behar du* formatik itxaron zitekeenez.

Har dezagun orain *ezin* aditza eta diogu: *Ezin dut joan.* Baina, aditz honekin normala denez, ordena aldatzen bada, *ezin joan naiz* esan behar da. Oso gaizki legoke *ezin joan dut.* Hegoaldekoei *nahi* aditza horrela erabiltzea, agian, gogorrago egingo zaie, baina Iparraldean bereizkuntza badago. *Nora eraman nahi nauzu,* baina *nora joan nahi zira.* Honen sinonimo '*gura*' aditza ez dut inon intransitiboan entzun, ez irakurri, bera erabiltzen den eremuan ez baita bereizte hori ezagutzen, ez *gura*-rekin, ez *nahi*-rekin. Baina batekin egiten dena bestearekin egin ahal izatea normala da, guztizko sinonimoak baitira.

Beti transitiboan erabiltzen diren eremuan ere, aditz hauek badute portaera bitxi samar bat. Alde batetik, transitiboak dira, nahiz eta datxekien aditza intransitiboa izan. Hortik, beraz, ez dute beste aditzaren eraginik hartzen. Baina transitiboan, beste aditzaren konplementuak eragiten die. *Bertsoa kantatu behar dut,* baina *bertsoak kantatu behar ditut.* '*Bertsoak*' horrek, *kantatu* aditzaren konplementu izanik, badirudi ez lukeela beste aditz nagusia afektatu behar. *Bertsoak kantatu behar dut.* Baina ez da horrela. Horrek esan nahi du aditz modal hauek badutela halako menpetasun bat aditz nagusiarekiko. Menpetasun hori beste tradizioak izaera intransitiboa ere ezartzeraino darama.

Orain galde daiteke: zeini heldu behar zaio? Aditz-joko bakarreko erabilera nagusiari ala bereizten dakien tradizio txikiagoari? Nik, aukeran, honetan eta beste hainbat puntutan, tradizio bereizlea hobetsiko nuke. Euskararen batasun ahalik aberatsenaren bidean, dauzkagun baliabide guztiak integratu behar dira, eta horretarako, irizpide orokor handienetako bat legez, bereizkuntza dagoen lekuan, hartaz baliatzera jo behar da. Edo, behintzat, hartaz baliatzea ezin da gaitzetsi.

Bereizteak hirugarren pertsonan kontrabereizte bat dakar. *Hemen ezin du egon* esan ohi duenak oso ondo bereizten ditu hori eta *hemen ezin*

*da egon*. Bata da *aquí no puede estar (él-ella)*, eta bestea, inpertsonala, *aquí no se puede estar*. Transitiboa eta intransitiboa bereizten dituenak hirugarren pertsonan agertzen zaion kointzidentzia hori nola gainditu? Hori beste kontu bat da, eta ikusi egin behar, kontestuaren arabera, edo beste baliabide batez.

## *Era pasiboa*

Euskaraz ez dakit, zorrozki harturik, pasiborik baden ala ez den, edo zer esan daitekeen. Era pasiboa adierazteko modua badaukagu, eta horixe da interesatzen zaiguna. Hala ere, bada oraindik hutsune zerbait, edo zalantza, behintzat. Forma bat, nagusia bera, argi dago. *Etxe hau erosi dut* eta *etxe hau neuk erosia izan da*. Erdaretan: *he comprado esta casa*, eta *esta casa ha sido comprada por mí*. Diferentzia argi dago. Erdaretan *esta casa* bi aditzen subjektua da. *Ha sido* eta *comprada*, biak *esta casa* subjektuari dagozkie. Euskaraz, berriz, *etxe hau* eta *izan da* elkarloturik doaz, baina *erosia* aditzaren subjektua *nik* da. Beraz, erostearen egile subjektu berak darrai: *neuk erosi dut*, batean, eta *neuk erosia*, bestean ere. Alde horretatik lehenean gaudela dirudi, hots, ez garela aktibotik pasibora iragan.

Baina zer gertatzen da aditz pasiboa, edo pasibotzakoa, aurretik esan eta subjektua atzera bota behar denean, sarritan gertatu ohi denez? Adibidez, etxe baten aurrean zaude eta lagunari diotsazu: *Etxe hau erosia izan da aa...* eta airean geratu zara. Badakizu erosia izan dena, baina eroslearen izenaz ez zara gogoratzen. *Etxe hau erosia izan da aa... Mendi Etxegintzak erosia izan da*. Ezin duzu esan: *Etxe hau erosia izan da aa... Mendi Etxegintzak*. Lehenengoa esan beharko zenuke, egitura pasibo guztia errepikatuz. Ez dago gaizki, baina tramankulu handiegia da, sistematikoki erabiltzeko, batez ere, errepika efektu negatiboa dela uste bada. Zerbaitegatik asmatu dute hizkuntzek errepikak ekiditeko hainbat era. Zenbait kontestutan, poesian, oratorian eta abar, errepika baliabide literarioa izan daiteke, beti ere, abusatu gabe. Baina, normalean, hizkuntzek errepikak ekiditera jotzen dute.

Ikusten dudan konponbiderik onena ALDETIK partikula erabiltzea da: *Etxe hau azkenean ere erosia izan da, ez gutxi kostata eta ez, seguruenik azpijoko gutxi eginda, Mendi Etxegintzaren aldetik*. Norbaitek pentsa lezake ea zergatik ez dudan esan behar: *Etxe hau azkenean ere Mendi Etxegintzak erosia izan da, ez gutxi kostata, eta ez, seguruenik...* Arrazoi asko egon litezke subjektu bat atzera pasatzeko, batzuetan, nahitaezkoa, beste batzuetan, komenizkoa, beste batzuetan, estetikoa, edo soil soilik, aukerazkoa, horixe egiteko gogoak eman digulako. Hizkuntzak kasu horietarako baliabide bat eduki behar du, eta '*aldetik*' horrixe deritzot egokien. GATIK atzizkia ('Mendi Etxegintzagatik', erdarazko 'por' delakoaren imitazioz) ez dut inola ere eginkizun horretarako ikusten. Atzizki horrek bestela ere badu aski eremu, pasiboaz oso bestelako azepzioak, gainera. '*Aldetik*' bezala, beste aukera bat ere izan daitekeela? Esaterako: "Etxe hau zerak erosi du, Mendi Etxegintzak". Aukera ezberdinak izan daitezke, noski, baina hobe bakarra edo ahalik gutxien nagusitzea. Eginkizun hain zehatz eta espezifiko bati baliabide sinonimoak jartzeagaz, ez dugu nahasmena besterik irabazten.

Atzera pasaturik ondo legokeena tokian bertan ere ontzat jo al liteke? Adibidez: *Etxe hau Mendi Etxegintzaren aldetik erosia izan da*. Zergatik ez? Baliabide sistematikotzat, beharbada, bestea hobetsi arren, hau ere ezin da gaitzetsi.

## *Aditz trinkoak*

Aditz trinkoen erabilera euskara aberatsagoaren ezaugarritzat goraipatu izan da, gauza handitzat joa izateraino. Aditzon galera progresiboa ikusita, balorapen ulergarria da, baina, bestela, aditz trinkoei ez zaie inolako meritu berezirik zor, bera baita aditzaren forma naturala. Inguruko hizkuntzetan inor ez dut ikusi hainbeste aditz trinko darabilelako harrotzen. Bera dute ohiko aditz-joko, denbora batzuk laguntzailez osatzen badituzte ere.

Euskaraz, garai batean, horrelaxe izango zela segurutzat joko nuke. Gure aditz perifrastikoak krisi edo perturbazio gogor baten ondorio izatearen itxura guztia dauka. Krisi horren eragile latina izango zen, noski. Erromatar inperioak eta latinak hainbat hizkuntza desagertarazi zituen. Globalizazioa orduan ere. Euskarak, zorionez, bizirautea lortu zuen, baina

erromanizazio handia jasanik. Gure aditza ahuldu eta, azkenean, eten egingo zen. Euskarritzat aditz laguntzaile bat hartu, eta aditz nagusia geldi. Hala ere, denboren arabera, nahiko forma ezberdinetan banatu zen: *ikus, ikusi, ikusten, ikusiko*. Aditz laguntzailea, ostera, berdin jokatzen segi behar da. Orduan, zer alde egon daiteke aditz bat jokatzetik denak jokatzera? Teorian, bat jokatzen duenak besteak ere berdin jokatu behar lituzke, aditz-joko bera aplikatzea baita, aditz irregularrak ez badira. Bizikletan ibiltzen dakienak ez dauka bizikleta berri bakoitzean ikaskuntza osoa errepikatu beharrik.

Hala ere, aditz trinkoak galduz doaz, eta aditz laguntzailea galtzen ez bada, pozik. Kontestu horretan, nostalgiak atzematen gaitu, baina hotzean ikusita, gabezia baten marka gupidagabea da. Gure alabak, bost urte zituenean, zekien erdara apurrean, Oihenartek euskaraz baino askoz aditz trinko gehiago zerabilen. Duela bi mila eta bostehun urte, seguruenik, haur euskaldun guztiak aditz trinkoan mintzatuko ziren.

Galduz datozen aditz trinkoen eboluzioari aurrekoz atzerantz begiratzen badiogu, atzerago eta ugariago dira, ahozko tradizioak eta literatura ez hain zaharrak garbi dioskunez. Gaurko aditz trinkoen zerrenda oso laburra da, ia sinboliko hutsa: *joan, egon, ibili, etorri, ekarri, eraman-eroan, eduki, erabili, jakin, jardun-iharduki, atxeki, jario, jarraiki, etzan, irudi, iraun, esan-erran, egin*... Eta laguntzaileak eurak, noski: *izan, ukan, edin, ezan*. Badira beste batzuk ere, han hemen, oso lokalak: *eragon, erauntsi, irakin, eutsi*... Zerrenda honetatik batzuk zenbait formatan erdi fosilduak daude, beste batzuk erdizka, eta gehien daukatenek ere denbora batzuk bakarrik hartzen dituzte. Gainerako guztietan, laguntzailea behar da.

Gaurko kopurua joan zen mendean handiagoa zen, aurrekoan handiagoa, eta hala handituz goaz hamabost-hamaseigarren mendera arte. Hortik harantz ez daukagu argitasun handirik, baina orduan ere joera galkorra zekarrena, bost mende aurrerago, askoz zabalagoa izango zela atera behar da, eta hala mendeetan atzerantz, arestian aipatu krisigunea jo arte. Honen aurretik, gure aditzaren joko normala trinkoa izango zela pentsatzea ez da ameskeria. Denbora batzuetarako, laguntzaileaz baliatuko zen, baina ez guztietarako, gero krisiak eragingo zuen bezala.

Joera galkor hori etsipenez, ezinean jasan behar al dugu, eboluzioaren





zergatzat jorik? 'Eboluzio' hitza degenerazioaren eufemismoa ere izan baitaiteke! Normalkuntzaren lege sano batek norabide galkorra irabazkor bihurtu behar luke. Aditz trinkoen kasuan, geldiarazi ez ezik, alderantzitu ere egin behar luke. Galtzea bat-batekoa izan ez denez, irabaztea ere ez daiteke bat-batekoa izan, noski. Baina bai presa pixka bat ezarri beharrekoa. Hizkuntza idatzian, eta mailak bereiziz (ez da berdin egunkari bat edo eleberri bat), ahoz ohi ez diren aditz trinkoak ugaltzea ez litzateke pedanteriatzat jo behar. Ezta euskara ez dakit nolakoagoen seinaletzat ere, egitura funtzional soil baten aplikaziotzat baizik.

Lehen urratsa erabilera ezaguna ukan dutenen ber-abioa litzateke. Horrela, *ikusi, entzun, ezagutu, irakin*, eta abar. Eta ezagutu zaizkienez gainera, denbora berrietara hedatu. Ez dakit *nekuske, lirudike, lirakike* inon ageri diren, baina *zekusen, zirudien, zirakian*... esan eta kantatu badira, zergatik ez besteak ere?

Behin norabidea alderantzitzen jarriz gero, ezagutu ditugunen bila bakarrik jotzea anbizio kaxkarra litzateke. Lege bati, kasu honetan analogiari, tiraka hasi eta bide laurdenean planto egitea ziztrinkeria litzateke. Zeren '*etorri*' jokatzen dakienak zergatik ez dezake '*erori*' berdin joka, edo '*ibili*' dakienak, '*irauli*'? Bota dezagun zerrendatxo bat: *jan, edan, eman, ebaki, erabaki, ekin, jagon, igon, irauli, itzuli, hausi, jausi, ikasi, erosi, egosi, jarri, ezarri, iragarri, igorri, irakurri, jaulki, erantzi, itsatsi, irentsi, irakatsi, egotzi, ehortzi, utzi*... Ba, *izan, ukan, ezan, eraman, jakin, egon, ekarri, erabili*... deritzen bizikletetan ibiltzen badakienak beste horietan ibiltzeko ez dauka artista izan beharrik.

Har dezagun *ekarri-ezarri* tandena.

| Dakart | Dazart | Dakardan | Dazardan | Nekarte | Nekarke |
|---|---|---|---|---|---|
| dakark | dazark | ekark | ezark | hekarke | hezarke |
| dakar | dazar | bekar | bezar | lekarke | lezarke |
| dakargu | dazargu | dagargun | dazargun | genekarke | genezarke |
| dakarzu | dazarzu | ekarzu | ezarzu | zenezarke | zenezarke |
| dakarzue | dazarzue | ekarzue | ezarzue | zenezarkete | zenezarkete |
| dakarte | dazarte | bekarte | bezarte | lekarkete | lezarkete |

Eta berdin beste denborak. Gauza errazagorik! Koska bat. Aditz hauetan, lehen bokala A bihurtzeko legeari eusten jarraitu behar al genuke? *Ibili = nabil, dabil... eraman = daramat, narama...* eta horrela? Aplikazio berrietan ez nuke lege hori aplikatuko. Zenbat eta aldakuntza gutxiago, aditza argiago eta errazago geratuko da. Gutxirekin ez dago nahasmen problemarik, baina ugaldu ahala, ekibokoak eta kointzidentzia desegokiak probableago dira. Gainera, bokal horri berean eustea ez da guztizko berritasuna. Hor daude *ezan* aditzaren zenbait forma, *dezadan, dezan, dezagun, dezaket...*, nahiz eta gero *nazan, hazan* egin, seguruenik, subjuntibo iraganeko *nezan, he(n)zan* formekiko ekibokoa ekiditearren. Baita hor daude *niz, diraki, derama, dirudi, deritzot, dirau...* formak ere. Beraz, aplikazio berrietan, arrazoiren batek salbuespena eskatzen ez duenean, bokalik ez aldatzeko eredua hobetsiko nuke, *dezart, neror, demat, nitzul, diragart, dirakurt...* eginez.

Honezkero, ohartuko zineten aditz trinkoen izaera bitxi batez, hots, denak bokalez hasten direla (*ekarri, egon, jakin...*), J ere bokala baita ahoskeraz. Aditz trinkoa aditz-joko normala izango zela suposatu dugun antzinate hartan, ez ote zegoen kontsonantez hasten zen aditzik? Eta baldin bazegoen, zer egiten ote zuten? Ez naiz alferreko aieruetan menturatuko. Gaur aditzik gehienak kontsonantez hasten zaizkigu. Horiei ez al legoke joko sintetikoa aplikatzerik, behin norabide horri helduz gero?

Aditz transitiboetan, lehenengo problema, denbora batzuetan, haserako D hori litzateke, *dakart, dakit, daramat,* eta horrelako denetan ageri dena. Konplementuaren adierazle omen den elementu hori hortxe gelditu da fosildua, nahiz eta aspaldidanik ez dugun halakotzat identifikatzen. Har dezagun, adibidez, *sartu* aditza. Hau ere jokatzekotan, *dasart, dasark...* egingo al genuke? Ezta pentsatu ere! Izatekotan, *sart, sark, sar, sargu, sarzu, sarzue, sarte...* eta horrela besteak.

Dagoeneko, zenbait muturretan zimur arraroak sumatzen ditut, "nora garamatza honek?" pentsatuz. Ez daukat norabide-aldan alferrik urruntzeko gogorik. Auzi nagusia norabidea aldatzea bera da. Horretarako, aski borondate ager baledi, gero ikusiko genuke noraino jo. Bitartean, utzidazue, behintzat, fikzioaz gozatzen.





Dena dela, kontsonantez hasten direnetan ere, inperatiboan, behintzat, *botaizu, beteizu, kantaizu...* bizkaieraz normalak dira. *Egizu* edo *eizu* aditz laguntzailearen laburdura dela? Zenbateko bidea dago hortik edo beste euskalkietako *bota zazu, pentsa zazu, kanta zazu* horietatik *botazu, pentsazu, kantazu* formetara? Aditz laguntzailea guztiz ezabatu eta subjektua utzi besterik ez dago. Berriz ere muzin aurpegiak imajinatzen ditut, eta utz dezadan bertan.

Atala laburbilduz, denbora bat harturik, gure aditzagaz, honakoak esatera beharturik gaude: *etorriko nintzateke, eroriko nintzateke, ibiliko nintzateke, ausartuko nintzateke, itzarriko nintzateke, ekarriko nuke, ikusiko nuke, isuriko nuke, irudituko luke...* "Hizkuntza bakoitzak bere dimentsioak dauzka", esan izan didate, baina ni, benetan ere, nekatu egiten naiz adizkera horiek esaten eta kantatzen, batez ere, pensatzen dudanean honela esan zitezkeela: *nentorke, nerorke, nenbilke, nausarke, nitzarke, nekarke, nekuske, nisurke, lirudike...*

## *Atzizki adizgileak*

Erromatarrak hemen ibili zirenetik, hitz bat aditz bihurtzeko, atzizki aktibo bakarra DU-TU dugu, beste I atzizkia fosildurik geratu baita. Edozein hitzi TU-DU eransteak hura aditz bihurtzen du: *horma-hormatu, zelai-zelaitu, bera-beratu, maiz-maiztu, on-ondu, isil-isildu...* Gaztelaniak, atzizkiaz gainera, aurrizki bat ezarri ohi dio sarritan: *paquete-empaquetar, barco-embarcar, peor-empeorar, cómodo-acomodar, consejo-aconsejar, compás-acompasar...* Euskaraz ez dago dudarik, aditzen izenak existitzen badira, izen horietatik zuzen adiztutako formak hobeak direla. Eta, gainera, laburragoak. *Probetxu, interes, konpas, bonba, kanpo, barku, boltsa...* gure hitzak badira, hortik natural sortutako aditzek *probetxatu-probextu, interestu, konpastu, bonbatu, kanpotu-kanporatu, barkuratu, boltsa(ra)tu...* behar dute.

RA atzizki deklinatzailea beharrezko al da, zentzu hori daukatenetan? Ez dago gaizki. Batzuetan, beharrezko edo komenizko izango da, baina ahal den guztian, elementuak gutxitzera jo behar da. *Hur* hitzetik *hurreratu* ateratzen dugu, eta ez *hurtu, hurbil*-etik, ordea, *hurbildu*, baina *hurbileratu*

ere ez legoke gaizki. Beste batzuetan, forma biak: *urrundu-urruneratu, urrutitu-urrutiratu, adindu-adineratu, menpetu-menperatu, gaindu-gaineratu.*

Zer gertatuko litzateke *untziratu, boltsaratu, gailurreratu, hilkutxaratu, aldameneratu, helmugaratu, oheratu,* eta abarren ordez, *untzitu, boltsatu, gailurtu, hilkutxatu, aldamendu, helmugatu, ohatu* egingo bagenu? Elipsia gehitu eta laburtasuna irabazi. Eta hizkuntzan aurreratu. Elipsia da aurrerakuntzaren giltza nagusietako bat, euskarak hitz elkarketan ondo adierazten duenez. Zer da, adibidez, dirutik zuzen sortu dugun *dirutu* aditza? *Ameriketara joan zen eta diruturik itzuli zen. Martxa honetan laster dirutu behar dugu.* Beraz, *dirutu* diru asko egitea, diru ugariren jabe egitea litzateke. Elipsi handia dago hor. *Diruztatu* jarri behar al dugu nahitaez? Kapritxoa bada, jar lasai, baina ez legoke premiarik.

Beste gauza bat da forma ezberdinek esanahi ezberdinak ematen dituztenean: *hustu-hutseratu, urtu-ureratu.* Orduan ez dago dudarik. Sinonimo samarrak izan arren, baliteke ñabardura ezberdina edukitzea. *Dirutu* gauza bat izan liteke, eta *diruztatu* gauza beraren kopurua nabarmenagoa. Litezkeen diferentzia guztiak probextu behar dira. Bistan da *zulotu-zulatu* eta *zuloratu* gauza ezberdinak direla. *Uztartu* ere, berez, *uztarriratu* litzateke, *amildu amileratu* edo *baztertu bazterreratu* bezala, baina ez dago premiarik, ez baitago bi kontzeptu bereizteko motiborik. Era honetan joko nituzke *kartzelatu, klaustrotu-klaustratu, kaiolatu, menpetu, itzalpetu, lurpetu, putzutu, giltzatu, giltzapetu, leizetu-leizatu, auzitu, gailurtu, gaindu, azpitu, bidetu, konortetu, kordetu, zentzutu-zentzatu, bizkartu, sasoitu...*

Ez diot inola ere *kartzelaratu, auziperatu, klaustroratu, kaiolaratu, menperatu, konorteratu, bizkarreratu, sasoiratu...* gaizki daudenik. Diodan bakarra da elipsia eta hitzaren laburtasuna aurrerapentzat jotzen ditudala. Zeren, gero, aditz horiek aurrizkia har edo aditz-izenak sor ditzakete. Hitz baten forma finkatu besterik ez dugu egin. Hortik aurrera joko handia faltsa da oraindik. Esaterako, DES aurrizkia jarrita, nola garatu behar dute RA atzizkidun aditzek? *Desboltsaratu, desuntziratu, deskaiolaratu, deslurperatu, desbideratu*? Eta, gero, aditz hauetatik aditz-izenak datoz. Orduan *desboltsaraketa, desuntziraketa, desbideraketa*? Hitz horribleak dira. *Keta* atzizkiaren eta *des* aurrizkiaren arteko RA atzizki deklinatibo horrek ez





dauka zentzurik, izatekotan, *nora* barik, *nondik* bailitzateke. *Desboltsaratu* boltsatik atera litzateke. *Desbideratu* bidetik atera, bidea galdu. Kontzeptu hori eta nora adierazten duen RA atzizkia kontradiktorioak dira. Beraz, *desboltsatu, desbidetu.* Eta *desbideraketa*? Zer da hori, *desbide* besterik? *Desbide* soila nahikoa den lekuan, *desbideraketa* eta gisako esperpentoak zabaltzen badira, hizkuntza zelebrea datorkigu.

TU-DU atzizkiak elipsi mota asko sortzen du, eta horixe da bere eginkizuna. *Larrutu, lumatu,* adibidez, *larrugabetu, lumagabetu* dira. Eta *ra* edo *gabe* bezala, TU-DU atzizkiak beste atzizki asko har edo ezaba dezake: *lasterKAtu, gaineZtu, legeZtu, legeZTAtu, legeZKOtu, gaineZKAtu, etxeKOtu, hiriTARtu, neuGANdu, zuGANAtu, indarGAtu-indarGEtu, indarGABEtu, minBERAtu...* Azken batez, edozein atzizki. TU-DU atzizkiak edozein hitz adiztu baitezake. Atzizki gehienak hitzari dagozkionak izango dira. *Minberatu, minkortu, mingarritu, minzaletu* aditzetan, adibidez, *bera, kor, garri, zale* atzizkiak hitzei eurei dagozkie, aditza sortu aurretik. TU-DU atzizkiak hitz hori osoan hartu eta adiztu besterik ez du egin.

Hemen, batez ere, hitz bat adizteko, bitartean sartzen den atzizkia interesatzen zaigu, deklinabide-atzizkiak nagusi direla. Eta hauetan, elipsiaz ahalik gehien baliatzea proposatzen ari naiz. *Egurkatu, gainezkatu, legeztu-legeztatu, legezkotu, giltzaperatu, auziperatu,* eta abar gaitzetsi gabe, noski, nahiago ditut *egurtu, gaineztu, legetu, giltza(pe)tu, auzitu.* Hauek, nolabait esateko, markagabeak lirateke. Tarteko atzizkien bitartez, kontzeptu edo ñabardura ezberdinen bila jo behar da. Hauek badaudenean, dudarik ere ez, bereizi beharra. Baina kontzeptu normala, aparteko kargarik gabea, adierazten denean, ahalik hitzik sinpleena komeni da, beste atzizkien bitartez, beste zenbait kontzeptu edo ñabardura posible adierazteko bidea estrangulatu gabe. Zerbait legean jartzea, beste konnotaziorik gabe, *legeztatu* badiogu, gero honen ñabardura naturala emateko, hots, *legez bete edo josi, lege gehiegi ezarri* adierazteko, hitza okupaturik aurkitzen dugu. Badakit hitz berak azepzio ezberdinak edukitzea ere gauza normala dena, baina hobea, diferentziak adieraz ditzaketen baliabideak probextea. Horrela, adibidez: *legetu* = *lege bihurtu, legean jarri. Dekretu bat legetu, egoera legetu. Legepetu* = *legera makurtu, legeari obeditu.* ("Etxetik ihes egin zuenetik, gehiago ez zen legepetu"). *Legeztu* = *legez jantzi, legez hornitu.* (Badugu konstituzio berria. Orain hau legeztu

egin behar da). *Legeztatu = lege gehiegi egin, nazkatzeko adina lege bota*, ("Administrazioak bazterrak legeztatu besterik ez du egin aurten"). Honek guztiak xehatuegi eman dezake, polit, agian, baina praktikan ezinezko. Ez hainbeste. Hauek eta litezkeen xehetasun guztiak hizkuntzaren bere senetik harakoak dira, eta hiztegi on batean ordenatzen eta definitzen dira denak. Lan honen norabide nagusi bat horretaraxe doa, hain zuzen.

## *Bokalen ezabatzea*

Gorago azaldu bezala, euskal bokalen ezabatze erraza bezain naturala hemen ere aplika genezake. Dagigun fantasia apur bat. *Sorpresa, promesa, esamesa, progresu, kongresu, laineza, arnasa, matasa, ehiza, airoso, nagusi, biluzi, itsaso, konpromezu, arkakuso, enbarazu, paradisu, lehengusu, geruza...* hitzen aditzak gaizki al leudeke honela: *sorprestu, promestu, esamestu, progrestu, kongrestu, laineztu, arnastu, matastu, ehiztu, airostu, nagustu, biluztu, itsastu, konpromeztu, arkakustu, enbaraztu, paradistu, lehengustu, geruztu*? *Promestu, probextu, sorprestu, nagustu, biluztu* herri hizkeran normal entzun ditut. Euskaldun askok *pastu, pasten* diote *pasatu, pasatzen* horien ordez. Lokalismoetan sartu beharreko laburdurak direla? Baina kasu honetan, nahi bada kointzidentzia soilez, aukera arrazoitsua da. *Pasatu*-ren erroa ez da *pasa, pas* baizik. Honen atzetik, bokal bakoitzak bere emaitza lortuko du: *pasa, pase, paso, pasu*. TU-DU atzizki latinoaz ari garenez, *amo-amas-amare-amavi-amatum* aditzaren fitxan, garbi dago *am* dela erroa. Hortik datoz gero *amare* aditza eta *amor* izena, eta bokal hori, segun zertarako, aldatu egiten da. Orduan *pastu* diotenak, oharkabean bada ere, ez dira laburtzaile arbitrarioak. Ingelesarentzat, *pass* da aditza baita izena ere, zenbait kasutan. Frantsesarentzat, berriz, *pas* da izena. Ez gabiltza, beraz, hain arlote.

Beste kontsonante batzuekin ere berdin aplika daiteke baliabidea: *Arrakala-arrakaldu, astrapala-astrapaldu, sakela-sakeldu, erregela-erregeldu, txabola-txaboldu, kaiola-kaioldu, makila-makildu, maratila-maratildu, habaila-habaildu, zarraila-zarraildu, tabula-tabuldu, korapilo-korapildu, mordoilo-mordoildu, zurrubilo-zurrunbildu, ganbelu-ganbeldu, urgulu-urguldu, ispilu-ispildu, puspulu-puspuldu*. Edo *giharre-gihartu, txatarra-txatartu, matxorra-matxortu, otarre-otartu, egarri-egartu, uztarri-uztartu, aterri-atertu*.





Edo *ordenatu-ordendu, intzirina-intzirindu, sardina-sardindu, bobina-bobindu, birjina-birjindu, burdina-burdindu, gasolina-gasolindu, amona-amondu, aitona-aitondu, fortuna-fortundu, gaztaina-gaztaindu, destaina-destaindu, hutsune-hutsundu, oxigeno-oxigendu, tximino-tximindu, poligono-poligondu, fenomeno-fenomendu*.

Azken batez, elkarkuntz legea TU-DU atzizkiarekin ere aplikatzea besterik ez da. *Egarbera, sardinburu, urgulbide, txabolondo, otarrazpi* ondo badaude, bide beretik besteak. Kasu batzuetan hobeto ematen dute, erabilerak hala eman duelako. Beste batzuetan, nahiko arraro egingo dira. Eta, ez gutxitan, halako bertigo bat sortzen, euskal bokalen izaera geldigaitzaren ondorioz.

Lege hori alderantziz ere aplikatzen da inoiz. *Harreman* hitzetik *harremandu* behar duelarik, *harremanatu* ikusi izan dut idazle ospetsuen liburuetan. Hori belarria hanpaturik edukitzea da.

Euskarak atzizki honegaz egin duen asimilatze lana garbi ageri da *konpondu, mantendu* eta horrelakoekin ere. Hauetan, *konponitu, mantenitu* aditzei I bokala jatean (konpon-i-tu, manten-i-tu), fonetika naturalak *konpondu, mantendu* bihurtu ditu. Analogiaz, berdin egin litezke: *dispondu, expondu, abstendu, detendu, sostendu, interbendu...*

Har ditzagun orain *harmonia, sintonia* eta horrelako diptongodun amaierako hitzak. Gorago esan dut azken A hori, gutxienez, optatiboa izan litekeela. Nik nahiago nuke hitzak *harmoni, sintoni* izatea. Ingelesak *harmony, syntony* egiten du, eta frantsesak azken bokalik ez du ahozkatzen. Hitza *harmoni* izanik, aditza *harmonitu* litzateke, eta arestian aipatu asimilatze lanak *harmondu* bihurtuko luke. Bide honetatik genituzke *harmondu, sintondu, sinkrondu...* Forma hauek, erabileraz eta beste zenbait irizpidez, ez dute, noski, eskubiderik izango, baina euskararen barrutik begiraturik, *harmonizatu, sintonizatu, sinkronizatu* eta gisakoen ondoan, ez lukete abantaila txikia. Eta, berriz ere, ez gabiltza hain arlote, erroak *harmon, sinton, sinkron* baitira. Halaber, *kolonia-kolonitu-kolondu* eginik, erro-errora joko genuke, Kolon edo Kristobal Kolon baita, hain zuzen, hitz horien sorburua. Fantasia diruditen hauen guztien azpian, beraz, bada hizkuntzaren sen handi bat ere.

## *Zenbait erdal atzizki adizgile*

### -IZATU

Erdarek, gorago aipatu aurrizkiez gainera, hitz bat adizteko badute zenbait atzizki. Hauetako bat *ize-izer-izar*: *formalize, formalizer, formalizar*. Euskaraz, *formalizatu*. Derradan, lehenbizi, forma hauek onartzeko inolako erreparorik ez dudala, hitz osoa hartu behar bada. Baina hori ez da normalena (ez dakit inoiz gertatzen den), aditz horiek euren lehen osagarria argi baitaramate. *Formalizar, canalizar, legalizar* aditzetan *formal, canal, legal* hitzak garbi daude. Euskaraz, *normal, formal, kanal(e), legal, natural, ideal, penal, bibentzial, komertzial, ofizial, espezial, fosil, fusil, espazial, espainol, bisual, ritual, moral, sozial, plural, unibertsal*... hitz normaltzat eta onartutzat emanez gero, horien aditz naturalak *normalizatu, formalizatu*, eta abar barik, *normaldu, formaldu, kanaldu, legaldu, naturaldu, idealdu, penaldu, bibentzialdu, komertzialdu, ofizialdu, espezialdu, fosildu, fusildu, espazialdu, espainoldu, bisualdu, ritualdu, moraldu, sozialdu, pluraldu, unibertsaldu*... izango dira.

Berdin BLE gehi IZAR atzizkiak: *Flexible-flexibilizar*. Hemen ere, *flexible, sensible, posible, konpatible, estable*... adjektiboak onartzen badira (orain ez naiz ari adjektibo horiek juzkatzen), euretatiko aditz naturalak *flexibletu, sensibletu, posibletu, konpatibletu, establetu*... lirateke. Edo AR atzizkia: *sekular-sekulartu, partikular-partikulartu, erregular-erregulartu, singular-singulartu*...

Baita izenetatik hara ere. *Hipnotizatu* hipnosia eragitea bada, *hipnositu-hipnostu* egoki litzateke. Berdin *ioi* hitzetik *iondu, kristau-kristautu, alegori-alegoritu, atomo-atomotu, tronu-tronutu-tronuratu, garanti-garantitu, ralenti-ralentitu*. Izen bereziekin ere hamaika sortzen da: *Vietnam-Vietnamizatu-Vietnamdu, Pasteur-pasteurizatu-pasteurtu, Satan-satanizatu-satandu, Ulster-ulsterizatu- ulstertu*... Edo adjektiboetatik: *fribolo-fribolotu-friboldu, moderno-modernotu, sponsor-sponsortu*. Honen aditza eta aditz-izena *esponsorizatu-esponsorizazio* ala *sponsortu-sponsortze* izan, badago aldea, batez ere, deklinatzen hasitakoan.

Euskaratik begiraturik, *hipnosi, enfasi, osmosi, metamorfosi, parafrasi, fantasi(a)*... izenak badira, horien aditzak *hipnostu, enfastu, osmostu, metamorfostu, parafrastu, fantastu* izan litezke, hitzaren azken I bokala, erdian harrapaturik gelditzean, ezabatzea oso naturala baita. Gero erdaren ardura da eurek nola adizten duten: *hipnotizar, enfatizar*, ala *metamorfosear, parafrasear, fantasear*, ala beste era batean. Behar denean, mailegu-atzizki horri inolako muzinik ez diodala garbi utzirik, *hipnotizatu, enfatizatu, esponsorizatu* formetatik *hipnostu, enfastu, sponsortu* formetara ez da gutxi aurrezten.





Beste kontu bat da zenbait aditz halako hitz batetik (*legal* ala *lege*-tik, *penal* ala *pena*-tik) ateratzea komeni den, ala, agian, beste hitz batetik (*pena*-tik barik *zigor*-etik). Ala, agian, forma horrekin zerikusirik ez daukan beste aditzen bat egon litekeen. Edo *humanizatu* ordez *humanotu-humandu*, edo soilki beste hitzen batez: *gizatu, gizakortu*...

Baita beste kontu bat da aditz batzuk dauden-daudenean hartzeko arrazoiak daudela. *Zibilizatu*, adibidez, badirudi *zibildu* baino gehiago dela, nahiz eta hortik etorri. Bere aditz-izen *zibilizazio*-rekin batera, hain da hitz sozialki eta zientifikoki markatua, ezen zaila da berrikutzen hastea. *Zibildu* ere ondo etorriko da esanahiren batean. Horrelakoak izan daitezke *realizatu, kanonizatu, mekanizatu, polarizatu*, eta abar. Horrelakoetan, jakina, ez daukat inolako erreparorik. Zein hitz jo hauetakotzat -*moralizatu, ebagelizatu*, adibidez?-, hori banan-banan erabakitzekoa da. Azken batez, hitz guztiekin horixe egin behar baita, banan hartu eta banan erabaki.

### -FIKATU

Atzizki adizgile honetaz ere berdintsu esan daiteke. Aditza sortzen duen elementua euskaraz garbi existitzen denean, bertatik abiatu eta geure legea aplikatzeak dirudi zuzenen. *Plan, momia, santu, dibertso, gloria, sinple*... gure hitzak badira, hauen aditzak *plandu-plan egin, momiatu-momitu, santutu-santu egin, dibertsotu, gloria-gloriatu-loriatu, sinple-sinpletu*...

Beste batzuetan, etimologia garbi egon arren, euskaraz lehen hitza ez da existitzen, edo ez da normala, esanahi horretan, behintzat, edo hitza osoan hartzea da onena: *mortifikatu, fortifikatu, pontifikatu, justifikatu, kuantifikatu, mitifikatu*...

Beste batzuetan –*ramificar, rectificar, clarificar, vivificar, purificar, ratificar*...– argi dago euskarak bere hitzekin moldatu behar dituela kontzeptu horiek: *adartu, zuzendu, argitu, bizitu, garbitu, berretsi*... eta horrela, edo horrelatsu. Aurreko zerrendako batzuk ere –*mortifikatu, fortifikatu*...– agian, bide honetatik hobeto leudeke. Hala ere, *rektifikatu, purifikatu, ratifikatu, mortifikatu, fortifikatu*... geure adiztzat hartu behar direla uste dut.

Iruzkin bat *eszenifikatu* aditzaz. Lehenik, izentzat nahiago nuke *eskena*, fonetikaz hobea eta bere jatorri grekotik hurbilago. *Eskena*-tik abiaturik, aditz naturala *eskenatu* genuke, bere aditz-izena *eskenatze* duela. Beraz, *eskenatu-eskenatze* = *eskenifikatu-eskenifikazio*. Badago aldea bikote batetik bestera, laburrean eta bizian.

EAR-EO

Gaztelaniaz EAR aditz atzizkia garrantzitsua da: *ladear, vadear, redondear, mangonear, mosquear, silabear, tornear, contornear, saborear, mordisquear, merodear, cimbrear, potear, sortear,* eta abar. Argi dago hauetako askok edo gehienek euren aditz sortzaile horietatik at behar dutela: *redondear, mordisquear, sortear* = *biribildu, haginkatu, zotz egin*, eta horrela.

Baina euskaraz onartzen ditugun hitzak adizten badira? *Tornu, zapore, pilota, silaba, zunda, tantu, bloke, bonba, mostra, sano, kolore, kopla, aire, haize*... adizturik, *blokeatu, piloteatu,* eta gero horien aditz-izenek *blokeo, piloteo* eta horrela izan behar al dute? Oro har, atzizki horiek ez ditut begiko. Horrek ez du kentzen zenbait hitz, *planteatu,* adibidez, datozen moduan hartu behar ez direnik. Emandako zerrendaren aditz naturalak *tornutu, zaporatu, pilotatu, silabatu, zundatu, blokatu, bonbatu, mostratu, sanotu, koloratu, koplatu, airatu, haizatu* edo horrelako zerbait lirateke. Aditz hauek, gehienean, egintza bertua edo maiztasuna adierazten dute. Hori nabarmentzea komeni bada, KA atzizkia edo gisako baliabide bat tarteka daiteke: *voltear, besuquear* = *iraulkatu, musukatu.* Baita zerbaiten ugaritasuna ere: *gasear* = *gaseztu-gaseztatu.*

Badira gero anglo-hitzak, gaztelaniaren arabera hartzen ditugunak:





*boxeatu, nokeatu, teikeatu*... Gaztelaniak *box, knock, take,* eta abar bere jitera egokitzen ditu: *boxear, noquear, teiquear.* Euskarak ez luke bitarteko alkahueterik behar, hitzak datozen jatorritik bere erara asimilatzeko. Beraz, *nokatu, teikatu, surfatu-surf egin, pibotatu, crakatu, testatu, txekatu, xokatu* (crack, test, check, shock). *Boxeo-boxeatu-boxeadore* bezala, aspalditik mailegatu ditugun hitzei zer egin? Agian, zentzuzkoena dauden moduan uztea izango da, baina *box, boxtu, boxlari* gustura entzungo nituzke. *Ez naiz boxlaria, baina boxa gustatzen zait,* diasporako euskaldun askok esango luketenez.

Hitz-erro baten maila gramatikal ezberdinen familiek norabide ezberdinak ukan ditzakete, segun nondik hasten den:

Adjektibotik: *on-ondu-ontze-ontasun-ongarri*...
Adberbiotik: *maiz-maiztu-maizte-maiztasun*...
Izenordainetik: *nor-nortu-nortze-nortasun*...
Izenetik: *harri-harritu-harritze-harridura*...
Aditzetik: *egin-egintza-egite-egingarri*...

Gaztelaniak, horretan, jarraipide okerrak ematen dizkigu sarritan. Adibidez: *evolución-evolucionar-evolucionable-evolutivo*... Argi dago *evolución* aditz-izena dela, aurreko aditz batetik harakoa, latinez *evolvere* (evolvo, evolvis, evolvere, evolvi, evolutum). Hortik hasten da ingelesa: *to evolve-evolution-evolutionary.* Gaztelaniak, berriz, aditz-izena bera adizten du berriro. Hala beste kasu batzuetan: *presión-presionar, convulsión-convulsionar, colección-coleccionar, solución-solucionar*... Ingelesak: *to press-pressure, to convulse-convulsion, to collect-collection, to select-selection, to solve-solution*... Garbi dago ingelesarena eredua hobea litzatekeela guretzat.

Okerrena da, euskaratik hara ari garenean ere, sarritan, gaztelaniaren ereduak menperatzen gaituela. Adibidez: *condición-condicionar-condicionante-condicional.* Orduan, euskaraz ere: *baldintza-baldintzatu-baldintzagarri-baldintzazko*... Baina euskaraz *baldin* partikula ez al da abiaburu? Orduan, aditza hortik ateratzea litzateke bidezkoen. Beraz: *baldin-baldindu-baldintza-baldingarri-baldintzaile.* Edo, agian, hobeto *baldin* bera izentzat harturik, *kondizio* esanahian. Honela, *baldin-baldintsu-baldinezko-baldingabe*... izenetik hara, eta aditzetik,

*baldindu-baldintzaile-baldingarri-baldingaitz-baldinkor...* Hain fortunosoak ez diren *baldintzatu* eta *baldintzagarri* bezalako hitzak garbitzeak osasuna freskatuko liguke.

## Aditz bikoitzak

Euskarak oso egitura berea du osagarri biko aditzak eratzea. Horretan, ingelesaren askoz kideago da gaztelaniaren baino. Aditz batek beste hitz bat –gehienean, izena edo adjektiboa– absorbitzen du, eta bien artean osotasun bakarra egiten dute.

IZAN: gose izan, egarri izan, atsegin izan, beldur izan, ari izan...
UKAN: maite ukan, gorroto ukan, behar ukan, erruki ukan...
EGIN: barre egin, ihes egin, hanka egin, lo egin, dantzan egin...
HARTU: min hartu, lo hartu, loak hartu, arnasa hartu...
EMAN: min eman, hatzeman, hitz eman, amore eman, antzeman...
ESAN: gezurra esan, gaizki esan, gaitz esan, ondo esan...

Eta beste batzuk. Biren arteko unitate kontzeptual bakar hori lortzean, izena edo adjektiboa mugagabean geldituko dira, atributuak edo konplementuak ez balira bezala. *Lurra jo du* = lurrera erori da, baina *lur jo du* = hondatu da, kemen gabe, adore gabe gelditu da.

Baliabide hori euskarak ustiatzea oso bidezko da. Noraino, ordea? Nahiko koska latza planteatzen da hemen, bai kontzeptu aldetik, bai luzetasun aldetik. Gure aditzik gehienak, bestela ere, perifrastiko edo laguntzailedun izanik, aditzak eurak bikoitzak badira, lekutara joan gaitezke. "*Las gallinas empollan*" esateko, "*oiloek txitak ateratzen dituzte*" esan behar bada, maiz iritsiko gara kontrolez kanpo. '*Empollan*', hiru silaba; '*Txitak ateratzen dituzte*', bederatzi.

Ez da hori bakarrik. Kontzeptu aldetik ere, problemak ekar ditzake baliabide horrek. Hona zerrendatxo bat, hiztegietan aurki daitekeen hainbat adibidetako batzuekin osatua:

*Merodear:* Inguruka ibili.





*Vagabundear:* Hara eta hona ibili, han hemenka ibili, arloterian ibili.
*Corretear:* Han hemenka ibili.
*Revocar:* Atzera eraman, balio gabe utzi.
*Pavonear:* Harro ibili.
*Chispear:* Txinpartaka aritu.
*Bizquear:* Begia zeihartu.
*Desagradecer:* Esker txarra eman.
*Fraternizar:* Anaia gisa tratatu.
*Desalentar:* Gogoa kendu, gogoa galdu.
*Desbrozar:* Sasiak kendu.
*Descorchar:* Kortxoa atera, kortxoa kendu.
*Desenfundar:* Zorrotik atera, maginatik atera.
*Desentonar:* -rekin batera ez etorri, -rekin ados ez egon.
*Deshabitar:* Bizilagunik gabe geratu.
*Deshuesar:* Hezurrak kendu.
*Encariñarse:* -rekin gustaturik egon.
*Endemoniar:* Deabruak hartu, deabrua sartu.
*Enjambrar:* Erlakumea egin, bota.
*Ensañarse:* Krudelkeriaz jokatu, ekin eta ekin ibili.
*Entrecomillar:* Komatxo artean ezarri.
*Abarrotarse:* Mukururaino bete.
*Acuchillar:* Ganibetaz zastatu, ganibetakadak eman.
*Afeitarse:* Bizarra kendu, bizarra egin.
*Arrastrar:* Herrestan eraman. Herrestaka ibili.
*Arrollar:* Aurretik eraman.
*Beneficiar:* On egin, mesede egin, onura atera.
*Culpar:* Errua bota.
*Parpadear:* Begiak kliskatu.
*Jadear:* Arnasestuka aritu.
*Pregonar:* Pregoia jo.

Euskarazko ordain horiek, aditz bikoitzak baino areago, aditz posible baten definizioak edo azalpenak dira. Bestetik, aditz-izenak eta gainerakoak (*arrollar*→ *arrollador*→*arrollamiento...*) sortzeko ere, bidea ia itxita geratzen da. Eta, agian okerrena, hitzen azepzio berrien ahalbidea mozten da. Gaztelaniaz *acuchillar*-en lehen esanahia baliteke *ganibetaz zastatu, ganibetakadak eman* izatea, baina gero hortik beste azepzio

batzuetara lerratu da, *zorua akutxilatu,* adibidez. Hori ezin da izan *'zorua ganibetaz zastatu'* edo *'zoruan ganibetakadak eman'.*

Aditzez beste hitzetan ere berdin agertzen da problema. Hona hiztegietan ikusitako hainbat adibidetako batzuk:

*Impopular:* Herriak gaizki ikusia, gaizki hartua.
*Ilicitamente:* Zilegi izan gabe.
*Ilegítimo:* Legez kontrako.
*Impío:* Erlijio gabeko.
*Impiedad:* Erlijio gabetasun.
*Consecutivo:* Elkarren segidako.
*Descarriarse:* Bide okerretik joan.

Ohartzen naiz problema hau planteatzea konpontzea baino errazago dela, baina lan honen helburu handietako bat den hiztegi *'osoan eta nazionalean',* kontzeptuak hitz bakarrez euskaratzen saiatu beharra dago, itzulinguruak edo hitzaren definizioak ahalik gehien ekidinez.

## Aditz-izenak

Euskaraz, aditza izentzeko baliabide ugari daukagu atzizkietan. Behinena, TE-TZE: *egin-egite, eutsi-euste, lehertu-lehertze, jaio-jaiotze.* TZE hau, sarritan, TZA bihurtzen da, izentasuna nabariago utzirik: *bizitza, jaiotza, heriotza, ezkontza, laguntza...* Eta batzuetan, aditz-izenaz beste izen bat sortuz: *egite-egintza, jakite-jakintza, ekite-ekintza...* Atzizki nagusi horrez gainera, beste atzizki zerrenda luze bat daukagu:

MEN: Entzumen, ikusmen, pairamen, hondamen...
MENDI-MENDU: Hondamendi, urkamendu, begiramendu, kokamendu...
PEN: Hastapen, erantzupen, askapen, eramapen...
KUNTZA: Aurrerakuntza, aldakuntza, hornikuntza, berrikuntza...
KUNDE: Igokunde, altxakunde, jasokunde, pizkunde...
ZIO-ZINO-ZIONE: Txikizio, begitazino, laguntzino, burutazio, imitazione...
NTZA: Triskantza, akabantza, adiskidantza, eramantza...
ETA-KETA: Hileta, araketa, pentsaketa, azterketa, goldaketa...





DURA-TURA: Lotura, mindura, haustura, erretura...
ERA-KERA: Etorrera, hasiera, irteera, pentsakera, egikera...
ALDI: Emanaldi, botaldi, ikustaldi, altxaldi...
ADA-KADA: Sakada, tirakada, betekada, botakada...

Eta beste batzuk han hemenka. Ez gaude, beraz, aditzekin zernahi egiteko modurik gabe. Hona, ordea, hainbeste aukera edukirik, aditzetik aditz-izenerako jauzi elemental horretantxe behaztopatzen garela sarritan. Aditz garbia eta ezagun-ezaguna edukirik, aditz horren izenik ez dakigu. Ez daukagu. Zerrendatxo bat:

*Utzi:* Dejada
*Atera:* Sakea
*Sartu:* Entrada
*Jaio:* Nazimendua
*Itxoin:* Esperantza
*Ikusi:* Bista
*Aspertu:* Aburrimentua
*Ebaki:* Kortea
*Geratu:* Parada
*Egon:* Estantzia
*Sendatu:* Kura
*Erosi:* Konpra
*Saldu:* Benta
*Jo:* Pegada
*Jokatu:* Jugada
*Zauritu:* Herida
*Eduki:* Tenentzia
*Entzun:* Audizioa
*Ikutu:* Tokea
*Hartu:* Toma
*Kendu:* Kitea
*Irentsi:* Tragoa
*Agertu:* Aparizioa
*Estali:* Tapa
*Jantzi:* Bestimenta
*Esan:* Ditxoa

*Hurbildu:* Aproximazioa
*Irten:* Salida
*Joan:* Ida
*Igon:* Subida
*Egin:* Hetxoa
*Erantzun:* Kontestazioa
*Lehertu:* Esplosioa
*Itzali:* Apagoia
*Ulertu:* Entendimendua
*Nahasi-nahastu:* Mezkla
*Hautsi-apurtu:* Ruptura
*Heldu-iritsi:* Llegada
*Ikasi:* Estudioa

Badira beste atzizki batzuk, aditza agente bihurtzen, tokia adierazten, eta abar egiten dutenak. Hauetan ere, nahiko jauzi elementala dago, baina:

*Jan:* Komedorea
*Lo:* Dormitorioa
*Begiratu:* Miradorea
*Erosi:* Konpradorea
*Estali:* Tapa-tapoia
*Irten-urten:* Salientea
*Erantzun:* Kontestadorea
*Erre:* Kemadorea
*Hil:* Mortalitatea
*Heldu-atxiki:* Agarraderoa
*Ikusi:* Bidentea. Bisible-inbisiblea
*Ibili:* Anbulantea. Andaderak

Fenomeno hau harrigarria da, hotzean begiraturik. Bi gauza elkarrekiko nabarmentzen ditu. Alde batetik, hizkuntza baten ahultasunak nola erdi-erdiko egituretaraino ekar dezakeen erosioa. Eta, bestetik, eta horren ondorioz, erdararen inkurtsio gupidagabea. Zerrenda horretako aditzak ez dira edozein. Hor daude *utzi, atera, sartu, jaio, ikusi, ebaki, geratu, egon, igon, erosi, saldu, jan, joan, jo, eduki, entzun, erantzun, hartu, kendu, jantzi, irentsi, irten, egin, lo, erre, hil, ibili, ikasi, hautsi, erre, heldu...*





Euren artean, aditzik zaharrenetakoak eta egunerokoenak daude. Ez dira noiz edo noiz erabiltzeak deskuidaraz ditzakeen horietakoak. Eta, hala ere, aditzetik hurrengo jauzian bertan errenditzen dira. Proba dezagun alderantziz zer efektu daragiten. *Dejada, salida, nazimentu, dormitorio, komedore, konpradore, toma, entrada, ditxo...* normal esaten duen baten belarriari bota orain honakoak: *Ederki dejatu du txoko-txokoan. Trena laster salitzen da. Haurtxoa nazitu zaigu. Haurra dormitzen dago. Komedorean komitzen al duzu? A zer konpradorea etorri zaidan, zer konpratu ere ez dakiena! Haurrak ondo tomatzen al dizu bularra? Entratu bezala salitu naiz. Ditxo politak dezitzen ditu. Koalizioa ronpitu da. Idie (ida) ondo egin neban, baina bueltie botaka fazidu neban. Kemadore honek ez du ondo kematzen...*

Nazkagarria, ezta? Ba, horzkidura ematen duten horiek bezain anormalak dira besteak ere. Normaltasuna erabilerak dakar, noski. Belarriaren autodefentsa bat da. Lehenengotan min emango dio, baina beti min hartzen egoterik ez zaionez komeni, laster immunetuko da. Azken batez, hobe da hitz bat izorratzea belarriko mina baino. *Dejada* normaldu ondoren, laster hasiko da norbait esaten: *ederki dejatu du. Sake-sakatu-sakatzaile* ere horrelaxe hasiko ziren. Orain apenas min handirik egiten duten. *Aspertu* edo *gogaitu* aditzen aditz-izentzat *aburrimentua* normaldu zen, hortik orain *aburritu* ere normalduz doa, eta gustura, sinonimo bat gehiago daukagula eta. Aberastasuna. Egon pixka batean. Laster hasiko da *aburritu* aditza besteak alboratzen. *Gogaitu* ari da dagoeneko bazterretik jausten. *Aspertu*-ri ere laster helduko zaio txanda. Azkenean, *aburritu* bakarrik geratuko da, eta besteak arkaismoak izango dira. Orduan esango dugu zehaztasunean irabazi dugula, dispertsioa eliminatuz. Laster osatuko da familia osoa: a*burritu-aburrimentu-aburridore.* Hauetako bat sartzea aski da, ondoren beste guztiak erakartzeko. Gero etxekoak kanporatzea lan samurra da. Joaten utzi. Askatasun osoan. Eboluzioa.

Zer egin? Ez dago dudarik. Norabide hori aldatu egin behar da. Zertarako daukagu hainbeste atzizki, jauzirik oinarrizkoenetan ez balio izatekotan? Gramatiketan eta bestelako apologietan irakurri izan dut "euskarak alemanak baino atzizki-ahalmen handiagoa" daukala. Baikortasun hori arrazoizkoa litzateke, ahalmen teoriko hori praktikan gauzatzea lortu bagenu.

Norabidea aldatzekotan, ordea, ahalik zuzenen egin beharko da. Eta hemen dator KETA atzizkiaren kasua. Borondaterik handienez atzizkirik desegokiena nagusitu da, aditzak izentzeko. Orain dena da *jaurtiketa, botaketa, erorketa, ustelketa, geldiketa, erdiraketa, informaketa, kontaketa, salaketa, bortxaketa, erosketa, ordainketa, murrizketa, zatiketa, egosketa, atxiloketa, kanporaketa, fitxaketa, konparaketa, ikerketa, azterketa, barneraketa, zabalketa, topaketa, mozketa, zenbaketa, biraketa, sinaketa, urrunketa, hurbilketa, bazterketa, pintaketa, konponketa, eskalaketa, motibaketa...*

Aditza izentzeko eginkizun funtsezkoa, osoan, atzizki horri utzi zaiola dirudi. Berak ez dauka errurik, baina hauta... (*'hautaketa'* esango al dut?) hautatze okerragorik ez zitekeen egin. Hain zuzen, aditz-izen orokorra, markagabea, baliotsuena, aditz baten izen abstraktu eta konnotazio gabea ematen duena, TE-TZE atzizki hauxe da. Berau, sarritan, TZA. Honen erdi sinonimorik hurbilena PEN litzateke; ERA eta KUNTZA ere bai, hein batean, baina bakoitzak bere eremua daukala. Beraz, *hautatze-hautapen-hautaera* hortxe-hortxe lebiltzake. KERA-k zentzu modala ematen du, eta beste guztietan ere, bakoitzak bere ñabardura dakar, nahiz eta, sarritan, nahiko eremu zehazgabeak edo konpartituak ageri. (Ahaztu gabe, kasu honetan, badela bide laburrago bat, abiapuntutzat *'hautu'* harturik, hain zuzen, berak bakarrik, *hautatze-hautaketa* esan nahi duena).

Kontzertu horretan, KETA-k oso jite nabaria dauka, edo behar luke. Aditz baten ekintza adierazten du, noski, baina jarraitua, persistentea. Gauza bat da behin jaurtitzea, eta beste bat behin eta berriz jaurtitzea. Demagun entrenatzaileak jokalari bati hamabi penalti jaurtiarazten dizkiola, bata bestearen jarraian. Horixe litzateke *'jaurtiketa'* edo jaurtitzen aritzea. Orduan, entrenatzaileak esan dezake: *"Oro har, jaurtiketa ona egin duk, baina hamargarrena oso jaurtitze geldoa izan duk"*. *'Jaurtialdi geldoa'* ere ez legoke gaizki. Horrek esan nahi du KETA dela atzizkirik ekileena, operatiboena, eta tamalgarri litzateke bere izate hori galdu eta besteenak usurpatzera bidaltzea. Eta inoiz ez luke aditz intransitiborik atzizkitu behar. Horregatik, *erorketa, manifestaketa, ibilketa* bezalako aleak atzizki honi garondotik emandako tiroak dira.

Aditz-izentzat beste atzizki bat badago, oso laburra eta interesgarria.





Atzizki latinoa, baina euskarak bere erara asimilatu duena, gaztelaniarekin konparaturik. Gaztelaniaz, *arrimar, cantar, contar, cargar, mandar, pasar, gastar, tratar...* aditzen izenak *arrimo, canto, cuento, cargo, mando, gasto, trato...* dira. Oso baliabide ugaria da. Euskarak izen horiek honela beragandu ditu: *arrimu, kantu, kontu, kargu, mandu, gastu, tratu...* Beraz, U litzateke atzizkia.

Baina hona euskarak baliabideari hedapen propioa eman diola. Egitura horren asimilazioan, mailegutik zetorkion baino urrunago eraman du aplikazioa. Hona hitz zerrenda bat: *akabu, juzku, mantenu, eskapu, estimu, izkribu, ordenu, sosten(g)u, eskomiku, frogu, trisku, barku, salu, inkontru, manu, entregu...* Hauetan *trisku, salu,* seguruenik, eurok izango dira *triskatu, salatu* aditzen sorburu, eta ez alderantziz. *Inkontru, manu* ere goragoko sailean sar daitezke, *encuentro, mando*-ren parekotzat. Baina gaztelaniaz ez dira existitzen *juzgo, manteno, escribo, ordeno, sosteno,* baizik *juicio, mantenimiento, escrito, orden, ordenamiento, sosten-sostenimiento.* Ezta *escapo, estimo, pruebo, entrego* ere, *escape, estima, prueba, entrega* baizik. *Acabo* badator erdal hiztegian, baina ez dakit aspaldion erabilerarik daukan. *Barku,* seguruenik, latinezko *parco*-tik zuzen datorke, baina baliteke *barkatu*-tik era horretan aterea izatea ere.

Euskarak badauka *gatibu-katigu* hitza. Argi dago hau latinezko *captibus*-tik datorrela. Eta aditza *gatibatu-katigatu. Katigu,* bere aldaera *gatibu* bezala, adjektiboa da. *"Katigu nago"*, eta abar. Baina baita izena ere. *"Umeak katigu handia dakar", "ganadua katigu gogorra da", "ez dakit haren katigutik zelan libratu".* Hiztegietan *katigutasun, katigario, katigutza* eta horrelakoak badatoz, baina *'katigu'* bera, izen gisa, ez dut ikusi. Inon irakurri dudan ere ez dakit, baina herri-hizkeran oso entzuna eta erabilia da. Beraz, *katigatu*-tik *katigu* izena. Beharbada, prozesua ez zen hori izango, adjektibotik izenera jauzia baizik, baina jauzi errazagoa beti ere, *akabu, juzku, eskapu* eta horrelakoak inguruan edukirik. Eta nolanahi ere, batetik nahiz bestetik, helmuga bera.

Kontua da, erdarak etsenplurik eman gabeko kasuetan ere, euskarak bere erara landu duela atzizki hori. Analogia aplikaturik, *izkribu* dionak zergatik ez *inskribu, deskribu, suskribu,* edo *ordenu* dionak *entrenu,* edo *mantenu* dionak *entretenu,* edo *akabu* dionak *ezabu, absolbu,* edo

*progu* dionak *konprobu*, edo *eskomiku* dionak *komeku* ('komekatu' aditza badaukagu), eta hala *eboku, inboku, konboku, proboku, justifiku, plastifiku, aloku, pertzibu, harrapu* eta abar? *"Horrek ez dauka justifikurik"*, *"konprobuaren zain gaude"*, *"probokuak erantzuna behar du"*, eta gisakoak bizpahiru aldiz esandakoan, hain natural gerta litezke nola: *"horrek ez dauka justifikaziorik"*, *"konprobazioaren zain gaude"*, *"probokazioak erantzuna behar du"*.

Azkenik, ez nuke gogorazi gabe utzi nahi aditzaren partizipiozko forma bera izan daitekeela izen. *"Garbitu bat komeni zaik"*, *"emaion igurtzi bat"*, *"uraren ikutuak bizkortu nau"*, *"nola halako konpondua egin genuen, eta aurrera"*. Beraz, erdal eta euskal hiztegian *tocamiento, mirada, frotamiento, arreglo* eta abar sarrera gisa datozenean, baliabide hau ere nonbait eta nolabait adierazi behar da, euskarak oso berea eta emankorra baitu. Ez dut uste gehiegi edo batere kontuan hartzen denik. Aditz-izenen bat euskaratzen hastean, erdal patroiak tiraturik, kide atzizkidun baten bila (*ukitze, ukiera, ukipen, ukimendu...*) hasten gara, *ukitu* bera izan daitekeela ohartu gabe.

Atzizki hauek, eta besteak, eta denak, non mugatu eta finkatu behar dira? Hiztegian, duda gabe. Erdal-euskal hiztegian. Eta hiztegi 'oso eta nazional' batean. Bestela, ez dakust erosioari aurrea hartzeko modurik.

## *Edin laguntzailea*

Euskal aditzak, zenbait osagairen pilatzez, forma konplikatuak, ia esangaitzak, hartzen ditu sarritan. Hauetan, EDIN eta EZAN laguntzaileak dira nabarmenenak. Subjuntiboko oraina eta iragana:

*Nadin, hadin, dadin, gaitezen, zaitezen, zaitezten, daitezen.*
*Nendin, hendin, zedin, gintezen, zintezen, zintezten, zitezen.*

Orain arte ez dago koska handirik. Flexioetan datoz lanak, pertsona pluraletan, batez ere. Har dezagun *nori* kasua:

*Nakion, hakion, dakion, gakizkion, zakizkion, zakizkioten, dakizkion.*





*Nenkion, henkion, zekion, genkizkion, zenkizkion, zenkizkioten, zekizkion.*

Gauza konplikatuz doa, baina oraindik, tira. Har ditzagun *ahalerak*:

*Naiteke, haiteke, daiteke, gaitezke, zaitezke, zaitezkete, daitezke.*
*Ninteke, hinteke, liteke, gintezke, zintezke, zintezkete, litezke.*
*Nintekeen, hintekeen, zitekeen, gintezkeen, zintezkeen, zintezketen, zitezkeen.*

Betoz orain flexioak, noridunak, adibidez:

*Nakioke, hakioke, dakioke, gakizkioke, zakizkioke, zakizkiokete, dakizkioke.*
*Nenkioke, henkioke, lekioke, genkizkioke, zenkizkioke, zenkizkiokete, lekizkioke.*
*Nenkiokeen, henkiokeen, zekiokeen, genkizkiokeen, zenkizkiokeen, zenkizkioketen, zekizkiokeen.*

Hemen kalkulagailua atera beharreko piezak agertu zaizkigu. Ez al dago forma hauek sinpletzerik? Lehenik, pertsona pluraletan *-gu, zu, zuek-* alferreko elementu bat sartua dago. Pluralak omen direlako, Z pluralgilea eransten zaie, haserako G eta Z hizkiek subjektua ondo adieraziko ez balute bezala. Eta gero, gainera, *zu* eta *zuek* bereizi beharko dira. Hona pluralgile alferreko hori kendurik nola gera daitekeen:

*Nadin, hadin, dadin, gaiten, zaiten, zaizten, daitezen.*
*Nendin, hendin, zedin, ginten, zinten, zintezten, zitezen.*
*Naiteke, haiteke, daiteke, gaiteke, zaiteke, zaitezke, daitezke.*
*Ninteke, hinteke, liteke, ginteke, zinteke, zintezke, litezke.*
*Nintekeen, hintekeen, zitekeen, gintekeen, zintekeen, zintezkeen, zitezkeen.*

Forma hauek ez dira artifizialak eta tradizio gabeak. Orain, bi subjuntiboak sinpletze horren arabera, eta flexio datiboan:

*Nakion, hakion, dakion, gakion, zakion, zazkizkion, dakizkion.*
*Nenkion, henkion, zekion, genkion, zenkion, zenkizkion, zekizkion.*

Beste hiru ahalezkoetan, alferreko pluralgile hori kenduz gainera, *nori* adierazlea erditik azkenera pasa daiteke, ia euskaldun erdiek egin izan dugunez. *Naiteke*-tik *nakioke* edo *naitekio*. Bigarren eredu honek lana asko erraztuko du. Horrela, *nori* kasua harturik, adibidez:

*Naitekio, haitekio, daitekio, gaitekio, zaitekio, zaitezkio, daitezkio.*
*Nintekio, hintekio, litekio, gintekio, zintekio, zintezkio, litezkio.*
*Nintekion, hintekion, zitekion, gintekion, zintekion, zintezkion, zitezkion.*

Flexio horiek beharreko elementu guztiak dauzkate, abiaburutik askoz hurbilago daude, eta elkarren kidetasuna askoz nabariago. Baina, zoritxarrez, fantasian ari gara.

## Ezan laguntzailea

Jar ditzagun bi subjuntiboak:

*Dezadan, dezaan, dezan, dezagun, dezazun, dezazuen, dezaten.*
*Ditzadan, ditzaan, ditzan, ditzagun, ditzazun, ditzazuen, ditzaten.*
*Nezan, hezan, zezan, genezan, zenezan, zenezaten, zezaten.*
*Nitzan, hitzan, zitzan, genitzan, zenitzan, zenitzaten, zitzaten.*

Jar dezagun orain *nori* kasuan, konplementu singularrean eta pluralean:

*Diezaiodan, diezaioan, diezaion, diezaiogun, diezaiozun, diezaiozun, diezaiozuen, diezaioten.*

*Diezazkiodan, diezazkioan, diezazkion, diezazkiogun, diezazkiozun, diezazkiozuen, diezazkioten.*

*Niezaion, hiezaion, ziezaion, geniezaion, zeniezaion, zeniezaioten, ziezaioten.*

*Niezazkion, hiezazkion, ziezazkion, geniezazkion, zeniezazkion, zeniezazkioten, ziezazkioten.*

Hemen muturra zimurtu bazaizu, ikus hurrengoak:





*Dezaket, dezakek, dezake, dezakegu, dezakezu, dezakezue, dezakete.*
*Ditzaket, ditzakek, ditzake, ditzakegu, ditzakezu, ditzakezue, ditzakete.*
*Diezaiokek, diezaiokek, diezaioke, diezaiokezu, diezaiokezue, diezaiokete.*
*Diezazkioket, diezazkiokek, deizazkioke, diezazkiokegu, diezazkiokezu, diezazkiokezue, diezazkiokete.*

*Nezake, hezake, lezake, genezake, zenezake, zenezakete, lezakete.*
*Nitzake, hitzake, litzake, genitzake, zenitzake, zenitzakete, litzakete.*
*Niezaioke, hiezaioke, liezaioke, geniezaioke, zeniezaioke, zeniezaiokete, liezaiokete.*
*Niezazkioke, hiezazkioke, liezazkioke, geniezazkioke, zeniezazkioke, zeniezazkiokete, liezazkiokete.*
*Nezakeen, hezakeen, zezakeen, genezakeen, zenezakeen, zenezaketen, lezaketen.*
*Nitzakeen, hitzakeen, zitzakeen, genitzakeen, zenitzakeen, zenitzaketen, zitzaketen.*
*Niezazkiokeen, hiezazkiokeen, ziezazkiokeen, geniezazkiokeen, zeniezazkiokeen, zeniezazkioketen, ziezazkioketen.*

Horiek denak ez dira txantxetakoak. Arkanologiako biltzar planetario batera harro eraman litezke, baina erruki dut egunero forma horien beharrean dabilena. Konplexutasun hori guztia bi osagai soilek *nori* eta pluralak- ekarri dute. *Dezadan-diezaiodan-diezazkiodan. Genezake-geniezaioke-geniezazkioke.* Gezurra dirudi *geniezazkioke genezake*-ren flexioa dela, euskaldun askok, *ezan*-etik barik, *e(g)in*-etik, '*geinkioz*' esanda konpondu duguna. *Geinke-geinkio-geinkioz. Geinkioz* = hiru silaba / *geniezazkioke* = zazpi silaba. *Geinkiozen* = lau silaba / *geniezazkiokeen* = zortzi silaba. *Deiodan* = hiru silaba / *diezaiodan* = bost silaba. *Neion* = bi silaba / *niezaion* = lau silaba. *Beioz* = bi silaba / *biezazkio* = bost silaba. *Eidazuz* = hiru silaba / *iezazkidazu* = sei silaba.

'*Geinkioz*' ereduaren abantaila guztia bai datiboa eta bai pluralgilea azkenean jartzetik dator, beste ereduak erdian sartzen dituelarik. Gauza jakina da bazterrean erdian baino gutxiago alteratzen dela dena. Ez naiz orain bizkaierazko aditzaren abantailak bindikatzen hasiko, baina posizioak denen onerako hurbil daitezke.

Lau gauza nabarmendu nahi ditut, hurbiltze posible horretan. Lehenik, bizkaieraz beste ereduek ere, flexio gabeko intransitiboan, pluralgilea azkenean jartzen dute: *datoz, zatoz, dabiltz, daude (dagode), doaz...* Bigarrenik, pluralgilea Z da, eta ez ZKI. Forma hau flexioek zetari eragiten dioten metamorfosia da. Hirugarrenik, zetarekin batera, beste pluralgile nagusia T da, gehienean IT forma hartzen duena. Azkenik, bi pluralgile hauetako bakoitzak bere eremua dauka, baina, batzuetan, trukaturik ere oso natural ematen dute. *Dezaket: dezazket* edo *ditzaket. Lezake: lezazke* edo *litzake.*

Hauek honela, goazen orain datibora. *Dezadan-diezaiodan.* Hirugarren pertsonako datiboari dagokion O soil bat tartetzeko, patroia horrenbeste aldarazi gabe esan du euskaldun askok '*dezodan*'. Edo *emozu, errozu* eta ez *emaiozu, erraiozu*. Batean prozesua luzeagoa da: *dezadan* ⟶ *deza-o-dan* ⟶ *dezai-o-dan* ⟶ *diezai-o-dan.* I horiek zubi eufonikoak besterik ez dira. Beste ereduak, ordea, biderik laburren eta sinpleena hartzen du: *Dezadan* ⟶ *deza-o-dan* ⟶ *dez-o-dan.* AO = O. Bokal bat ezabatu eta eginda, euskarak hain berea duen jiteari jarraituz. Beraz: *dezodan, dezoan, dezon, dezogun, dezozun, dezoten.*

Eta plurala nola? Hor dauzkagu aurreko formak pluraldurik: *ditzadan, ditzazun... ditzaket, ditzakezu...nitzake, zenitzake... nitzakeen, zenitzakeen...* T eta Z naturalki trukagarri gerta daitezkeela egia bada, zergatik ez T bera utzi, hau kentzen eta ordez beste bat sartzeko lanetan abiatu gabe? *Dezaket-dezoket* egin dugun bezala, *ditzaket-ditzoket.* Edo *detzoket,* beste gabe.

Hau guztia arraro samar egin daiteke, baina ez da nik asmatua. *Dezodan, emozu, errozu* bezala, *dezon, dezoket, nezoke...* eta pluralak *detzake, netzake, dezazket, lezazke...* euskaldunen ahotik eta lumatik irten dira, inolako planteamendurik gabe. Badakit hedapen txikiagoa ukan dutela, baina askoz sinpleagoak eta argiagoak dira, dispertsio eufonikoetan galdu gabe. Eta hori ere, euskararen normalbidean, argumentu handia dela uste dut.

Hona, esanen arabera, nola geldituko litzatekeen, NI subjektutzat harturik:





*Dezadan: dezaadan, dezodan, dezazudan, dezazuedan, dezedan.*
*Ditzadan: ditzaadan, ditzodan, ditzazudan, ditzazuedan, ditzedan.*

*Dezaket: dezaaket, dezoket, dezazuket, dezazueket, dezeket.*
*Ditzaket: ditzaaket, ditzoket, ditzazuket, ditzazueket, ditzeket.*

*Nezake: nezaake, nezoke, nezazuke, nezazueke, nezeke.*
*Nitzake: nitzaake, nitzoke, nitzazuke, nitzazueke, nitzeke.*

Eredu honetan –bestean ere bai– kointzidentzia batzuk gerta daitezke. Adibidez, *ditzadan* izan daiteke *nik ekar ditzadan* edo *hark niri ekar ditzadan.* Ditzan gehi t = ditza-t-n = ditzadan. Kointzidentzia hautsi nahi izanez gero, datiboduna *ditzaidan* egin liteke. Orduan I horrek eginkizun argi bat dauka. Orain, konpara ditzagun eredu bateko eta besteko zenbait forma:

| | |
|---|---|
| *Dezodan.....diezaiodan* | *Dezogun........... diezaiogun* |
| *ditzodan.....diezazkiodan* | *ditzogun............ diezazkiogun* |
| *nezon......... niezaion* | *genezon............ geniezaion* |
| *nitzon........ niezazkion* | *genitzon............ geniezazkion* |
| *dezoket......diezaioket* | *dezokegu...........diezaiokegu* |
| *ditzoket..... diezazkioket* | *ditzokegu.......... diezazkiokegu* |
| *nezoke....... niezaioke* | *genezoke...........geniezaioke* |
| *nitzoke.......niezazkioke* | *genitzoke.......... geniezazkioke* |
| *nezokeen....niezaiokeen* | *genezokeen...... geniezaiokeen* |
| *nitzokeen....niezazkiokeen* | *genitzokeen...... geniezazkizukeen* |
| *zenezoke.... zeniezaioke* | *zenezokete......... zeniezaiokete* |
| *zenitzoke....zeniezazkioke* | *zenitzokete........ zeniezazkiokete* |

Badago aldea habe batetik bestera. Eredu luzeak gure 'laguntzailea' izan behar badu, esku ederretan gaude. Erabileraren hedapena une batez albora utzirik –ez dut ukatzen argumentu honen indarrik–, argi dago abantaila guztiak zeinen alde makurtzen diren. Hemen flexio gabeko plurala hartzen da patroitzat flexioetarako: *ditzadan, nitzan, ditzaket, zenitzake,* eta abar. Baina behin aukeran uzten hasiz gero, flexiodun pluraletan ere nahiago nuke patroi singularrari eutsi: *dezadan-dezodan-detzodan, zenezake-zenezoke-zenetzoke,* eta horrela. Zenbat eta sorburua gutxiago aldatu, argiago joango da ura.

"Aukeran uzten hasiz gero". Horixe da gakoa: *aukera*. Ez dut eredu bigentea gaitzesten. Forma horiek hor daude, komeni diren efektuak lortzeko. Besteak ere hor egon daitezke, komeni direnerako; eta ziur praktikak hauen komenentzia maizago eskatuko duela. Lehendik aski labirinto dugun aditzean beste tunel bat gehiago irekitzen ari garela? Oraingoan errazerantz, ordea. Funtzionaltasun handiagorantz.

EDIN eta EZAN aditzetan erabilitako irizpideak aditz laguntzaile orokorrean ere berdintsu aplikatuko nituzke. Ahal den guztian alferreko sarkinak garbitu. *Nituke, hituke, lituke*... bezalakoetan, plurala sobera adierazia badago, zertarako bi aldiz markatu, *nituzke, hituzke, lituzke*... eginez? Edo *gintzaioke, zintzaioke* bezalakoetan, *gu* eta *zu* subjektu pluralak ondo adierazita badaude, zertarako berriz pluraldu, *gintzaizkioke, zintzaizkioke* eginez? Eta plurala beharrezko denean, zergatik ez *litzaioke, nioke, lioke, zenioke*... honela pluraldu: *litzaiozke, niozke, liozke, zeniozke*?... Edo euskaldun askok eta askok erarik naturalenean egingo genukeen bezala: *litzaiokez, niokez, liokez, zeniokez*. *Litzake-litzateke* artean ere azkenean erdiko *te* horri eusten dion eredua onartu zen. Ezagutzen dut erabilera hori, egunero bainabil bera entzuteko inguruan, baina nahiago dut *litzake* eredua, hau erabiliago delako, beste ereduaren *te* atzizkia flexioetan ezabatu egiten delako, eta, azkenik, errazago eta laburrago delako.

Argumentuak zer komeni hala hartzen ditudala? Jakina! Ez ditugu geure buruak izorratzeko erabiliko! Gure aditzak, euskaldun guztiona eta normalagoa izango bada, behin agertzen eta behin ezkutatzen den hainbeste elementu nahasletatik garbitu on bat behar du, hala ere, sobera konplexu gelditzeko. Zenbat eta irregulartasun gutxiago, hainbat eredu argiago eta errazagoa izango da. Bestela ere, ez da zailtasunik falta, hizkiak hemen jar handik ken ibiltzeko. Argumentu orokor nagusia, beraz, hauxe litzateke: arbitrarioa ez den guztian, argitzera eta sinpletzera daramaten ereduak hobetsi behar lirateke.

## *Egin-ein-in*

Euskararen aditz bikoitzak sortzeko jite jakin horretan, EGIN aditza izango da, seguruenik, ugariena: *irri egin, negar egin, huts egin, hitz*





*egin*... Izenburuan EGIN-EIN-IN jarri dudana, beharbada, hobeto legoke IN-EIN-EGIN. Baliteke aditz originala, otxandiotar jentil bati entzuna diodanez, IN izatea, gaur ere hainbat lekutan entzuten denez. EIN aldaera litzateke, gaur egun gehien entzuna, eta, azkenik, EGIN forma kultoa, zenbait herritarren ahora ere iritsi dena.

Bitxitasun horiek alboraturik (bide batez, diodan '*bitxikeria*' gauza negatiboa dela, atzizki horri dagokionez), garbi dagoena da, atzizki bihurtzeko, IN-EIN direla egokienak. Zenbait aditzetan *–eten, itxoin, igon...*– ageri den azken N-ak IN horrekin zerikusia edukitzea ez litzateke harritzekoa. Azkuek '*urten*' aditzari '*urt egin*' aditz bikoitzaren laburdura suposatzen dio, bere joko transitiboa horrela esplikatuz. Berdin da. Berriz ere 'bitxitasunera' (hau ez da negatiboa) jo dugu.

Aditz bikoitz horiek aditz bakar bihurtzea da jokoa, *lokartu* bera *loak hartu*-ren fusioa den bezala. Orduan IN-EIN, TU edo I bezala, atzizki adizgile bat gehiago litzateke: *loin, soin, hatzein, hutsein, putzein, hatsein, zotzein, pizein*... Eta onomatopeikoak: *zastein, ziztein, koskein, kraskein, krakein, zartein, okein, postein, potein, txokein*... Hauek *lo egin, so egin, hatz egin, huts egin, hats egin, ok egin*... aditzen laburtze soilak izatekotan, ez gara askorik aurreratu. Baina ez da hori izango. Aditz fusionatu horien jatorria laster ezabatuko da. Hizkuntzalariak aztertuko ditu, baina hiztuna ez da ohartuko. *Itzuli* edo *hartu* bezain aditz bakun egingo zaizkio. Orduan, orain EGIN-ekin daudenez gainera, edozein hitz adizteko balio izango du, TU-DU atzizkiak bezala.

Eta gero, beste atal batean iradoki bezala, aditz trinkoen jokoa gehitzeko eta normaltzeko norabideak arrakastarik balu, baliabide horrek aurrerakuntza lekarke. Adibidez, oraingo *lo egiten dut, lo egiten duk, lo egiten du, lo egiten dugu, lo egiten duzu, lo egiten duzue, lo egiten dute* lirateke: *loit-loik-loi-loigu-loizu-loizue-loite*. Ez dugu espazio eta denbora gutxi irabazi. Fantasian bada ere, goza gaitezen aurrerapenaz.

## I atzizki adizgilea

Atzizki adizgile honek aditz garrantzitsu asko sortzen du: *erori, ageri, atzarri, etorri, igorri, hasi, ikasi, hezi, iraizi, etsi, ehortzi, itsatsi, itzali, itzuli, uzkaili, eskaini, ipini, edoski, ebaki, aurtiki...* Ohargarri da gehienak bokalez hasten direla, kontsonantedunak bakanak izanik: *nahasi, bidali, berezi, busti, kiskali, sorotzi...* Egongo da gehiago, baina beste bost aurkitzen lanak leudeke; eta euron izaera nondik norakoa den ikusi egin behar. Kontuan izan, aditz trinkoetan genioenez, J bokaltzak (i-y) hartu behar dela: *jarki, jaiki, jarraiki, jaulki,* eta abar. I atzizkidun gehienak bokalez hasteak aditz trinkokoetara garamatza, haiek ere denak bokalez hasten baitira. TU-DU atzizki latinoa sartu aurretik, aditz guztiak era horretakoak ote ziren?

Hemen axola digunerako, orain gertatzen da hain atzizki garrantzitsua fosildurik dagoela. Eta joera, beti ere, TU-DUri arloa uzten joatekoa da: *estali-estaldu, itzali-itzaldu, bidali-bidaldu, kiskali-kiskaldu, atzarri-atzartu...* Hauetatik bat geratzekotan, badakigu zein izango den. Fosildurik dagoela eta, hartan utzi behar al dugu? Zergatik ez hemen ere norabidean eutsi egin? Hiltzera daraman norabidea da bata; piztera daramana, bestea. Biak norabideak izanik, gutxienez, eskubide berdineko behar lukete. Okerrenean ere, piztera daramana alaiagoa izango da, ezta? Alde bakarra da fosil-bidea, gehienean, inkontzientea dela, eta piz-bideak kontzientea izan behar duela. Euskararen kasuan, urrats kontziente asko eman behar da, sendotasunean normalduko bada.

Merezi al du atzizki fosildu hori aktibatzea? Baietz esango nuke. Badakit zenbait gauza arkaiko pizten saiatzea, litekeena izan arren, bortxatua eta desegokia litzatekeela. Adibidez, *-rean* atzizkia (zerurean, linborean...) berpizteko setarik ez nuke, horren zuloa ondo betea baitago: *zerutik, linbotik...* Baina zerbait aportatuko lukeena bada, zergatik ez berriz abiarazi? I atzizkia zenbait kontsonantez amaitutako hitzak adizteko egokiagoa izan daiteke. Dagigun fikzio apur bat.

Demagun, adibidez, ingelesetik beste hizkuntzetara zabaltzen ari den hainbat hitz: *take, knock, surf, check, shock...* Gaztelaniak horien aditzak *teiquear, noquear, surfear, chequear...* egiten ditu. *Shoquear* ez dut entzun, baina izan liteke. Eta euskaraz, gaztelaniaren bitartez beti ere, *teikeatu, nokeatu, txekeatu...* Gutxienez, *teikatu, nokatu, txekatu...* behar lukete. Eta I atzizkiarekin hobeto, honen berpiztea onartuz gero: *teiki, noki, surfi, checki, shoki.* Honela, bat-batean, normala da hauen aditz izaeraz jabetzen kostatzea, baina ez lirateke *jeiki, ireki* eta abar baino arrotzago.





*Robot* hitza egunero darabilgu. Bere aditza gaztelaniaz *robotizar* da. Euskaraz, *robotizatu* esaten dugu. Forma horri ez diot begizkorik, baina gure atzizkiarekin, laburrago eta dotoreago litzateke *roboti* (edo *robotin-robotein*). Orain ez du balio, artifiziala baita, baina atzizkia biziaraztekotan, ez litzateke aplikazio txarra. Eta noraino zabaldu, gero ikusi. Batean fosildurik dauden, bestean arkaismoak diren, bestean lokalismoak diren, bestean ez dakit zeren aitzakian, euskarak dauzkan baliabide argiak garatzeko gauza ez bagara, norantz normaldu eta aberastu behar dugu hizkuntza?

## Beste zenbait aditz-atzizki

Euskarak atzizki egitura aberatsa daukala ez da gezurra, baina emankortzen ez badira, ez edukitzea baino okerrago gerta liteke. Batzuk aipatuko ditut, arlo garrantzitsu hau nola garatu ikusteko. Eta, bide batez, aplikaera onak eta aberaskorrak iradokitzeko.

DUN, ZALE, GIN: Hauexek dira eduki eta ez erabiltzearen adibiderik krudelenetakoak. Atzizki bizi-biziak izanik, fosilpenerantz doaz. Euskaldunik gehienek, Hegoaldean behintzat, *letxero, panadero...* esango dute. Inork ez du esango '*behiak letxea ematen du*' edo '*hauxe pan gozoa*', baina eguneroko hitz horietatik atzizkira dagoen jauzi xinplea egiteko ez dira gai. Adiera batean, *ogizalea naiz* edo *behi esneduna* aise esango dizute, baina lanbide edo ofizio adieran, erdarari hitz osoa kendu behar. Erdaraz: *leche-lechero-lechería, pan-panadero-panadería, carne-carnicero-carnicería...* eta euskaldunik gehienek (edo askok) *esne-letxero-letxeria, ogi-panadero-panaderia, okela/haragi-karnazero-karnazeria...* Hain jauzi elementaletan amore ematen duen hizkuntza benetan makal dago.

*Lechero* adierazteko, zenbait atzizki baliozko badauzkagu: *esnedun, esnezale, esneketari, esnegin...* Aberastasunak galtzen ote gaitu? Atzizki

hauek, euskararen barrutik, ñabardura ezberdinak dauzkate. Zer egingo dugu? Bat hautatu ala diferentziak ustiatu? Bigarren aukera litzateke benetako aberastasuna. Horrela, esnea dakarrena *esnedun* izan daiteke. *Esne-saltzaile* ere bai, noski, baina zertarako hain hitz luzea, atzizki batez adierazi ahal izanda? *Esnezale* esnera dedikatzen dena litzateke orokorki; esnean lan eta esnetik bizi dena. *Esnegin,* esnea egiten edo ekoizten duena. Horrela, esnearen prozesuan hiru figura ezberdin (edo gehiago) genituzke, gaztelaniaz *lechero* hitz bakarrez adierazten direnak. Berdin *ogidun-ogizale-okin, liburudun-liburuzale-liburugin.* Eta tokian ere bereiz daitezke *esnedenda-esnetegi-esnegintza, ogidenda-otegi-okintza,* eta abar. Hitz bakoitzean ikusi eta finkatu beharko, bi aldeak –bereiztasuna eta zehaztasuna– ondo begiraturik. Gauza berean, adiera berean, batek *ogidun,* bestek *okin,* bestek *ogizale,* bestek *ogi-sailtzaile* esanez ez dugu ezer irabazten. Dispertsio horrek '*panadero*' nagusitzea dakar.

GIN atzizkiaz bi hitz gehiago. Hain kontziso, adierazkor eta dotorea izatea lortua zuen atzizki hau fosilpenerantz doa ziztuan. Pitxi delikatuegia, antza, erosio garairako. Har dezagun egunero entzuteak normalarazi digun '*goleatzaile*' edo '*gol-egile*' hitza. Honek, gutxienez, *golgile* beharko luke. Zergatik ez *golgin*? Bada aldea. *Goleatzaile* = bost silaba. *Golgin* = bi silaba. Hori guztia, jakina, gaztelaniazko *goleador* hitzetik ez dago inola ere deduzitzerik. Eta '*golgin*' dionak berdin lioke *ongin, login, sogin, soingin, edergin, ardogin, zulogin, boikotgin...* hain natural esan dituen bezala: *hargin, zurgin, lugin, sugin, harakin, okin, gaizkin, ikazkin, emagin, ontzigin, lagungin, burugin, bastagin, behargin, bizargin, otargin, iturgin...* Hain hitz eleganteak sortu dituen atzizki batek ez luke fosiltzerik merezi behar.

LE-TZAILE: Atzizki beraren bi aldaerok, oro har, honela banatu dira: TU-DU atzizkidun aditzek TAILE-TZAILE: *moztaile, asmatzaile, hartzaile, apurtzaile, saltzaile, itzultzaile...* Besteek, LE soilik: *emaile, esale, jagole, jakile, igarle, arazle, ekarle, ikusle...* Baina praktikan atzizki ugari honen bi formak nahasturik aurkitzea oso ohikoa da, euskalkien eta eskualdeen arabera: *nahasle-nahastaile, jole-jotzaile, esale-esataile, ekile-ekintzaile, entzule- entzutaile, erakusle-erakustaile, isurle-isurtzaile, emaile-emotaile, hausle-haustaile, pizle-piztaile...* Batera nahiz bestera, aski oinarri baden kasuetan, ni beti laburraren alde. Beraz, *ikerle, azterle, zapuzle, jarraile, konponle...* Aurreko kontsonantea L dagokionean, *tzaile* behar du nahitaez:





*saltzaile, bidaltzaile, itzultzaile...* Eta beti ere, hitz bakoitzean erabakiz. Ez naiz hasiko *laguntzaile* ordez *lagunle* eta horrelakoak eskatzen. Agian, ehun urte barru...

GU: Hona beste atzizki labur eta dotore bat, aspaldi fosildua. Tokia adierazteko *toki, leku, tegi, gune, gela...* erabili ohi dira. Hauen aurka ez daukat ezer, baina bai GU elegantearen alde. Honek aditza atzizkitzen du. Ez legoke ondo, oraingoz behintzat, *haizegu* adibidez, *haizeleku, haizetoki* esateko. Baina *sargu, sorgu, jangu, edangu, etzangu, egongu...* sortu zituenak zergatik ez *logu, itxoingu-itxarongu, jolasgu, bilgu, ibilgu, salgu, zuzpergu, ikasgu, gizengu...* Ez naiz *logela-lotegi, itxarongela, jolasleku-jolastoki, biltoki-biletxe, ibilbide, saltoki, zuzperretxe, ikastegi-ikastetxe, gizendegi-gizentoki* gaitzesten hasiko, baina beste horiek bezalako forma labur eta dotorentzat toki bat nahi nuke.

TASUN: Atzizki solemne honek edozein hitz izen dezake. Batzuetan, ostera, izendu nahi den hitza nolakoa izan, halako forma trokoloak irteten dira. Esaterako, gaztelaniazko '*soberanía*' euskaraz '*subiranotasun*' esan nahi izaten da. 'Nahi' diot, nekez entzun baitut hitz hori ondo ahozkatzen, batez ere, deklinatzean, *subiranotasunari, subiranotasunarentzat,* eta abar esan behar direnean. *Subirotasunean, subirantasuna* eta gisako zelebrekeriak entzungo dituzu. Zaila baita, izan ere, hitz hori ahoan behar bezala antolatzen. Frantsesetik edo ingelesetik, gutxienez, *soberentasun* edo *suberentasun* aterako zatekeen. Trokoloa oraindik ere, baina zerbait esangarriago.

Zer egin? Kontzeptu garrantzitsu hori *subirano* hitzetik atera behar bada, erroari ez dagokion azken bokal hori ezaba dezagun, behintzat: *subirantasun.* Baina, horrez gainera, TASUN atzizkiak badu GO sinonimoa ere, ideia abstraktuak adierazteko oso egokia. Orduan *subirango* genuke. Hitz hau, behintzat, asekiblea da ahorako, baita belarrirako ere. Hala ere, kontzeptu hori *subirano*-tik barik, beste nondibait osatzea egokiago ez ote den ikusi beharko litzateke, baina hau ez da hori eztabaidatzeko tokia.

Har dezagun noiznahi erabili ohi den beste hitz bat: *eroso.* Honen izena *erosotasun* genuke, eta alderantzia, *deserosotasun.* Nahiko hitz trokoloa hau ere. Gutxienez, erdiko O bokala ezaba bedi: *deserostasun.* Alde batetik,

hori euskarari natural zaiolako, eta bestetik adjetiboa ere *eros(o)izan* daitekeelako, *lorios, handios*... bezala. Eta berriz ere, hor dago GO atzizkia. Beraz, *eros(o), erosgo, deserosgo. Deserosotasun* ala *deserosgo* izan, badago alde pixka bat. Koska bat: *erosgo* hitzak baluke 'erosi' aditzagaz gehiago asoziatzeko arriskua.

Dena dela, hitz honetan badago aurreragoko zerbait. *Eroso* zer da *'era'* handia edo asko daukana baizik? Hitz honek badu adiera bat *komoditate* kontzeptutik oso hurbil dagoena. *Era*-tik datorren *eroso* adjektiboak *komodo* esan nahi badu, *erak* berak hori esan nahi duelako izan behar. *Azken aldion nahiko eraz bizi gara* edo *aurrerapenak era gehiegi ez al dakar*? esatean, *'era'* hori ez da *erosotasuna* besterik. Eta *desera*, orduan, *inkomoditatea* litzateke. *Komoditate* kontzeptua ere zer da, ba, zehazki? Ingelesak *convenience* darabil esanahi horretan. Baita euskaldunok ere. *Etxe honetan komenentzia guztiak daude* esatean, zer diogu *'todas las comodidades'* besterik?

Honekin guztiarekin bi gauza daude argi. Batetik, atzizkia ondo hautatu behar da, aukera dagoenean, eta TASUNen kasuan, hortxe dago GO ere, atzizki laburra eta dotorea. Bestetik, atzizki-jokoan abiatu aurretik, bide hoberik eta laburragorik baden begiratu behar da, eta hori euskararen barrutik egin behar da, ez erdaren imitaziotik. Ez naiz ari neologismoak asmatzen, euskarak badauzkan baliabide argien garapena bultzatu nahian baizik.

KIN, GAILU: Atzizki hauek bata bestearen eremuan sartu ohi dira. KINen adiera askotarik bat tresna edo erreminta da: *bihurkin, zulakin*, eta abar. GAILUren adiera nagusia ere bera da. Bakoitzari bere esparrua ematekotan, honek makina zentzua har dezake, eta KINek tresna sinpleena edo egintza jakin bat zuzenki egiten duten piezena. Adibidez, *bihurkin* gaztelaniazko *destorniladore*, eta *bihurgailu* gaztelaniazko *konbertidore*. Hau makina konplexu bat da. Berdin *zapalgailu*, errepideetako zorua zapaldu ohi duen makina handi hori, edo *ordenagailu, kalkulagailu, kontagailu, garbigailu, hozkailu, berogailu, haizegailu*... Hauek guztiak, gutxi-asko, makinak dira.

*Destornillador* bezala, gaztelaniazko *rotulador, perforador, abridor, recogedor*... tresna soilak dira. Hauetan ere, gehienean, GAILU ikusten da;





baina KIN hobesgarri da: *rotulkin, zulakin, zabalkin, bilkin*...

GARRI, GAITZ, EZIN: Hiru atzizki hauek, euskaraz, erdaratik oso bestelako ekipoa osatzen dute, hain garrantzitsuak diren kontzeptuetarako. Erdaraz *domable, indomable, indomabilidad*. Euskaraz *hezgarri, hezgaitz, heziezin-heztezin*. Hitza osoan hartzen ez denean (*probable, posible, miserable*), BLE atzizkiaren kide bat GARRI da euskaraz: *egingarri, fidagarri, onargarri, miragarri* = factible, fiable, admisible, admirable.

Hauen ukoa, *in-admisible* eta abar, euskaraz EZINekin egiteko mania zabaldu da: *onartezin, ikustezin, barkaezin, enbargaezin*... Eta gero izenak, TASUN atzizkia gehituz: *hutsezintasun, bortxaezintasun, enbargaezintasun*... Joera hau berbidetu beharra dago. Ez dago horrenbeste konplikatu beharrik. EZIN bera da izena, tasuna. Adjektiboetarako ere bera erabiliz gero, *ikustezin* berdin izan daiteke *invisible* zein *invisibilidad*.

Ekiboko horrek ez gintuzke kezkatuko –hizkuntzan bada ekiboko ugari, kontestuak erabakitzen duena–, adjektiboentzat atzizki berezi bat ez bagenu: GAITZ. Honek, hain zuzen, zerbaiten ezina edo ezinezko izatea adierazten du. Hona hiru atzizkiekin, zerrenda posible bat:

*Husgarri-husgaitz-hutsezin* = falible-infalible-infalibilidad.
*Ikusgarri-ikusgaitz-ikustezin* = visible-invisible-invisibilidad.
*Hezgarri-hezgaitz-heztezin* = domable-indomable-indomabilidad.
*Ustelgarri-ustelgaitz-ustelezin* = corruptible-incorruptible-incorruptibilidad.
*Bortxagarri-bortxagaitz-bortxezin* = violable-inviolable-inviolavilidad.
*Ulergarri-ulergaitz-ulertezin* = comprensible-incomprensible-incomprensibilidad.
*Mugigarri-mugigaitz-mugiezin* = movible-inamovible-inamobilidad.
*Erregarri-erregaitz-erreezin* = combustible-incombustible-incombustibilidad.
*Sinesgarri-sinesgaitz-sinestezin* = creíble-increíble-incredibilidad.
*Zaurgarri-zaurgaitz-zaurrezin* = vulnerable-invulnerable-invulnerabilidad.
*Zatigarri-zatigaitz-zatiezin* = divisible-indivisible-indivisibilidad.
*Asegarri-asegaitz-aseezin* = saciable-insaciable-insaciabilidad.
*Jasangarri-jasangaitz-jasanezin* = soportable-insoportable-insoportabilidad.
*Banagarri-banagaitz-banaezin* = separable-inseparable-inseparabilidad.
*Aldagarri-aldagaitz-aldaezin* = mudable-inmutable-inmutabilidad.

Eremu garrantzitsu honetan (ikus, bestela, hiztegietan zenbat orri hartzen duten egitura honetako hitzek), abantailan gaude beste hizkuntzekiko. Baina abantailak... erabiltzekotan! Har ditzagun egunero dabiltzan hitzok: *compatible, incompatible, incompatibilidad.* Orain ez naiz hasiko kontzeptu hori *batera, elkar* edo gisako batez kidetu behar den eztabaidan. Aditz gisan, '*konpatitu*' bera hartuko dut, adibidea parean eramateko. Hiztegian ere sartuko nuke grekotik datorren erro garrantzitsu horrekiko aditza, erdal hiztegietan aditz gisan ez badator ere.

Euskaraz, hitz horretatik *konpatigarri-konpatigaitz-konpatiezin* litzateke. *Inkonpatibilitate* bezalako hitz beldurgarritik (zortzi silaba) ia erdira jaisten gara. Gero hitz hori deklinatu egin behar da, eta euskaraz deklinabide erantsia denez, begira nora goazen: *inkonpatibilitatea, inkonpatibilitateek, inkonpatibilitateari, inkonpatibilitateekiko...* Hitz hauek ondo esateko, aho jurasikoa behar da.

Eta GARRI atzizkiz osaturiko adjektiboak nola izendu? *Movible-movilidad, fiable- fiabilidad* eta horrelakoak, alegia. Gehien erabili den era adjektiboa bera izentzea da, TASUN atzizkiaren bidez. *Mugigarri, fidagarri, sinesgarri...* gehi TASUN: *mugigarritasun, fidagarritasun, sinesgarritasun...* Logikaz ez daude gaizki, baina hitz beldurgarrietara goaz berriz ere. Bi atzizki handi elkarren gainean, gehi kontzeptua bera, gehi deklinabidea gero. Ez al dago hitz hauek sinpletzeko modurik euskararen barrutik, erdal eredua kopiatu gabe?

Euskaraz bi atzizki egoki ikusten ditut: MEN eta BIDE-PIDE. Erdaretako *movilidad, vulnerabilidad* bezalako hitzek, batzuetan, ahalmen edo gaitasun subjektiboa esan nahi dute, beste batzuetan, konstatazio objektibo bat, dena ere ñabardura kontua da baina. Lagun batek mobilitaterik ez edukitzea berak mugitzeko ahalmenik ez edukitzea izan daiteke. Orduan '*mugimen*' egoki dator. Baina izan daiteke, berak ahalmena eduki arren, beste norbaitek –epaileak, adibidez– debekatu diolako ezin mugitzea. Orduan '*mugibide*' dagokio. Eta hitz-joko bat eginez, esan daiteke: *badut mugimena, baina mugibidea falta.* Euskaraz *ibilbide* hitza oso entzuna da adiera horretan: *ibilbidea galdu, ibilbidea berriz etorri...* Hona gaztelaniaz esaldi posible batzuk:





*La niebla quita toda visibilidad. Un partido que no ofrece ninguna credibilidad. Un ataque bien planeado debe prever tambien su propia vulnerabilidad. No veo en ti ninguna fiabilidad. Para garantizar la gobernabilidad.* Euskaraz: *Lainoak ikuspide osoa jaten du. Inolako sinespiderik eskaintzen ez duen alderdia. Eraso ongi planduak bere zaurbidea-bulnerabidea ere aurreikusi behar du. Zuregan ez dut inolako fidabiderik ikusten. Gobernabidea bermatzeko.* Edo beste era bat, agian, baina atzizki bakarrekoa.

Ahalmen subjektiboa adierazten dutenak MENekin esan dugu: *sentimen-sensibilidad, mugimen-movilidad, ustelmen-corruptibilidad, hilmen-mortalidad, zatimen-divisibilidad, estimamen-estimabilidad, sormen-creatividad, egokimen- adaptabilidad, konpatimen-compatibilidad, iraumen-perdurabilidad.* Har dezagun egunero darabilgun kontzeptu garrantzitsu bat, *responsabilidad, responsibilité, responsibility.* Euskaraz hor ibiltzen gara parean jo ezinik. Hitza dagoen bezala hartuz gero, *erresponsabilitatea, erresponsabilitatearekin* eta horrelakoak ateratzen zaizkigu, sekula ondo esaten asmatuko ez dugunak. Ez da motiborik falta. Hitz horiek esateko zigorretik libre nahi nuke.

Geure hitzekin konpontzekotan, zalantzan egon ohi gara *erantzun, ardura* ala nondik abiatu. Has gaitezen *erantzun*-etik, beste hizkuntzetan ere hortik baitator kate guztia. Baina, hasiz batera, zalantzak hemen ere: *erantzukizun, erantzunbehar, erantzumen...* Euskaratik begiraturik, *erantzun* izan daiteke aditz nahiz izen. Orduan bera izan daiteke bai *responder*, bai *responsabilidad. Nori egotzi behar zaio istilu hauen erantzuna? Nik ez daukat horren erantzunik.* Egia da *erantzun* hitza, gehienik, galderaren erantzunaz asoziatzen dugula. *Respuesta,* eta ez *responsabilidad.* Eta zer? Hitz berak adiera ezberdinak edukitzea ez da berria. Hala ere, bereizi nahi izanez gero, eta moduak baditugunez, *erantzumen* edo *erantzupen* iruditzen zait onena, eta agian biak, bakoitza bere ñabarduragaz. Jatorriz MEN eta PEN atzizki beraren aldaerak badira ere, gero MEN atzizkiari ahalmen edo subjektibotasun jitea eman zaio, horixe esan nahi duen 'men' hitzarekiko kointzidentziaz edo. Orduan *erantzumen* erantzuteko ahala edo gaitasuna litzateke, eta *erantzupen* erantzun beharra edo horrelako zerbait. Bakarra uztekotan, bi hauen artean legoke hautua.

Eta *responsable*? Ba, *erantzun*-etik hasi bagara, jauzi naturala *erantzule* da. Honek, gutxienez, bi adiera lituzke, bata galdetzaileari dagokion erantzulea, eta bestea karga edo ardura bat beregaintzen duena. Beraz, *responder-responsable-responsabilidad = erantzun (erantzumen-erantzupen) -erantzule-erantzupen.*

Baina *irresponsable* eta *responsabilizar* ere hor daude. Lehenengoa *arduragabe, axolagabe* eta horrela euskaratu ohi da. Kontzeptu positiboak *erantzun*-etik atera eta gero, kontrakoak ere erro beretik ateratzeari koherenteago deritzot. Horrela, *erantzule* hitzaren ukoa *ez-erantzule* edo *deserantzule* da. Eta *arduragabe, axolagabe...* sinonimoak lirateke, *irresponsable* ez baita *responsable* bezain kontzeptu zehatza. Normalean '*es un irresponsable*' esatean, ezertan ardurarik edo axolarik jartzen ez duena esan nahi da, beste gabe. Baina, batzuetan, '*no responsable*' esan nahi du zehazki. "*El niño es juridicamente irresponsable*" esatean, ez dugu haurra arduragabea dela esan nahi, erantzupenik ez daukala edo *ez-erantzule* dela baizik. Eta *irresponsabilidad*? Bi eratara lor daiteke. Bata edozein adjektibo bezala izentzetik, TASUN erantsiz. Beraz, *ez-erantzule + tasun = ez-erantzuletasun*. Bestea *erantzupen* hitza bera ukatuz: *ez-erantzupen*. Hau hobea, duda gabe.

Baina *responsabilizar* ere hor dago. Beste guztiak *erantzun* hitzetik burutu ondoren, orain ez dugu '*erresposabilizatu*' bezalako artefaktua sartuko, ezta? Hemen euskarak hain berea duen aditz bikoitzen egitura erabil daiteke: *erantzule egin, erantzule izan*. Edo *erantzule* adizturik *erantzuletu*. Normalean, lehen biak egokiago datozke, baina zenbait kasutan, bigarrena ere ondo izan daiteke. *Nor da krimen hauen erantzule? Inor ez al da hondamen honen erantzule egiten*? Hauek gaztelaniaz *quién se responsabiliza* edo *nadie se responsabiliza* lirateke. Edo berdin *quién se hace responsable*, biak sinonimoak baitira. Beraz, familia osoa honela genuke:

| | |
|---|---|
| *Erantzun* | *responder* |
| *Erantzule* | *responsable* |
| *Ez-erantzule* | *irresponsable* |
| *Erantzupen* | *responsabilidad* |
| *Ez-erantzupen* | *irresponsabilidad* |
| *Erantzule egin* | *responsabilizar(se)* |





Multzo batetik bestera alde pixka bat badago egituran. Adibide honetan, euskararen baliabide propioak garatzera jotzen da, baditugunean behintzat. Atzizki arloa da baliabide horietako bat.

Diodan, bide batez, adjektiboetan, esanahi ezberdinekoak direla *hauskor, sineskor, mugikor, hilkor* eta *hausgarri, sinesgarri, mugigarri, hilgarri*. Granitoa ez da hauskor, baina hausgarri izan daiteke. (K)OR atzizkiak barneko joera edo izaera adierazten du. *Sineskor* erraz sinestera jotzen duena da, edozeri fedea ematen diona, gaztelaniazko *crédulo* edo. Orduan adjektibo hauetatik *hauskortasun, hilkortasun* eta abar sortuko lirateke.

Diodan, azkenik, atzizkien eremuak ez direla guztiz zehatzak. Batzuetan, gurutzaturik ageri dira. Euskarak bere konbinapen propioak osatzera jo behar du; erdal ereduez beste konbinapen batzuk, eta hobeak, sarritan. Baina beti ere, hitzen familietan, ahalik koherentzia osoena eramanez. Mostra txiki horretan, beste atzizki askorekin ere bide bera egin daitekeela adierazi nahi nuen. Eta daitekeena bada, zergatik ez egin?

# HIZTEGI OSOA, NAZIONALA ETA BAKARRA

Lan honen helburu nagusietako bat HIZTEGI NAZIONAL OSOA ETA BAKARRA da. Eta horren barruan, batez ere, *Erdal-Euskal Hiztegi Nazional Osoa*. Definizio honetan, '*nazional*' aspektua geroagorako utzirik, bi gauza garrantzitsu daude. Batetik, '*erdal-euskal*', eta bestetik, '*osoa*'. Ez naiz sartuko hizkuntza batean barne hiztegiak diren ala ez garrantzitsuenak. Hori egia da hizkuntza guztietan, eta gurean ere bai, noski. Baina euskara oraindik normal-bidean dago, eta susmoa daukat bide luze samarra izango dela.

Hizkuntza batek eduki ditzakeen premiak bat baino gehiago izan daitezke. Hiztegiak ere era askotakoak daude, eta denak izan litezke beharrezko. Zein beharrezkoen? Besteei ezer kendu gabe, *Erdal-euskal Hiztegi Osoa* izan daiteke bat. Zergatik '*erdal-euskal*'? Bi arrazoi nagusi.

Batetik, euskararekin egunero lanean ari diren gehienek horixe behar dute gehien. Kazetari, itzultzaile, egokitzaile, bikoizle, maila guztietako euskararen irakasle edo ikasle, eta asignaturak euskaraz ematen edo hartzen

dituztenak, egunero ari dira erdal-euskal hiztegiak urratzen. Idazleok ere, neuk behintzat, horiexek kontsultatzen ditugu maizen. Euskararen normalkuntza praktikoa milaka lagunen kolektibo horrexen esku dago, gehienbat. Kolektibo hori osasuntsu badabil, hizkuntza osasuntsua irtengo da. Bera herbal ari bada, hizkuntza ere herbalduz joango da.

Bestetik, kontzeptuak eta gaurko hizkuntza baten eremuak erdaretan hobeto definituak eta finkatuak daude. Ez dugu, noski, itzulpen soila egin behar, baina nola edo hala, erdaren eremuak geureganatzen eta haien zehaztasuna imitatzen ez badugu, beti ibiliko gara apo-saltoka. Eta, azkenean, erdaren morroiago.

Eta hiztegi 'osoa'. Hemen dago gako nagusia eta zailena. Zenbat aldiz jotzen dugun alferrik hiztegietara, nahi dugun hitza edo adiera ez datorrela aurkitzeko! Datorrena ere orokorregia edo dudazkoa, edo konbentzitzen ez zaituena bada, azkenean, asmatzen hasi behar. Edo erdarazkoa sartu, eta aurrera. Hala ere, hiztegi horiek ezinbestekoak eta aurrerapen handikoak izan dira. Baina egileek ere bazekiten oso mugatuak zirela. Ez zegoen bestela izaterik.

Hona zenbait zenbaki konparagarri. Xabier Kintana, Jon Aurre, Rikardo Badiola, Sabin Egileor, Juan Luis Goikoetxea, Juanjo Zearreta eta Koldo Zuazoren taldearen *Hiztegia bi mila* izenekoan ESPAINIERA-EUSKARA HIZTEGIA-k "36.700 hitz eta 41.500 adiera" jartzen du.

Luis Maria Mugikaren DICCIONARIO GENERAL Y TECNICO. 1. CASTELLANO-EUSKARA-k dio: "Diccionario compuesto de unas 100.000 acepciones lexicales". Ehun mila izateko, orrialdeko berrehun bat behar ditu, eta batezbestea hortik urruntxo dagoela ematen dit. Zenbat hitz edo lexiko-sarrera ez du jartzen, baina berrogei bat mila kalkulatzen ditut.

Placido Mugicaren DICCIONARIO CASTELLANO-VASCO-k ez du jartzen kopururik. 35.000 hitz eta 50.000 adiera kalkulatzen dizkiot.

Har dezagun, orain, Elhuyar-en HIZTEGI ENTZIKLOPEDIKOA. Hau euskal hiztegi hutsa da, baina konparazioa egiteko berdin balio dezake. Honek dio: "50.000 lexiko-sarrera; 7.000 azpisarrera; 66.000 adiera".





Hiztegi entziklopedikoa denez, beste osagarri batzuk ere baditu, gure konparazioan sartzen ez direnak.

Irten berri den HIRU MILA HIZTEGIA-k, *Adorez 7*, dio: "45.000 hitz aukeratu, 65.000 adiera eta...". HIZTEGIA BI MILA-ren jarraipena den honek zortzi mila hitzetan eta hogeita hiru mila adieratan gehitu du aurreko lana.

Zehazki Hiztegiak, azkenik, ez du jartzen zenbat sarrera dakarren, baina 50.000 behera kalkulatzen dut, Elhuyarren antzera.

Orain begira gaztelaniazko Julio Casares-en DICCIONARIO IDEOLOGICO DE LA LENGUA ESPAÑOLA. 81.000 hitz edo lexiko-sarrera eta 150.000 adiera inguru. Kintanarena ez da hitzetan erdira, eta adieretan hirutik batera heltzen. Luis Maria Mugikarena hitzetan erdi inguru, eta adieretan hirutik bi. Placido Mugicarena hitzetan erdi baino gutxiago, eta adieretan hirutik bat. Hiztegi Entziklopedikoa hitzetan erdi baino gehiago, eta adieretan erdi baino gutxiago. Zehazki Hiztegia ere berdintsu. Badago alde pixka bat, ezta?

Konpara ditzagun orain beste era batera. Kintanarena bakarrik hartuko dut, hitz eta zenbakietan ez galtzeko. *Autoriz-* errotik, Kintanaren Hiztegiak *autorización* eta *autorizar* dakartza. Casaresenak: *autorizable, autorización, autorizadamente, autorizado, autorizador, autorizamiento, autorizador, autorizar*. 2-8 proportzioa. *Articul-* errotik, Kintanarenak: *articuladamente, articulación, articular, artículo*. Casaresenak: *articulación, articuladamente, articulado, articular* (adj.), *articular* (ad.), *articulatorio, articulista, artículo*. 4-8 proportzioa.

Beste kontu bat da hitz bati zenbat adiera ematen zaizkion. Adibidez:

| | |
|---|---|
| *Artículo:* | - 1) *Artikulu.* 2) *Gai.* Beraz, bi Kintanarenean. |
| | - Hamar adiera gehi hainbat aplikaera Casaresenean. |
| *Estribo:* | - *Ointoki.* Bat Kintanarenean. |
| | - Hamazortzi adiera eta aplikaera Casaresenean. |
| *Partido:* | - 1) *Partidu.* 2) *Alderdi.* Bi Kintanarenean |
| | - Hemeretzi adiera eta aplikaera Casaresenean. |

*Figura:* - *Irudi, figura, itxura.* Bat Kintanarenean.
- Hogeita hamahiru adiera eta aplikaera Casaresenean.

Konparazioa beste euskal hiztegiekin egin nahi duenak ez dauka lan zaila, apur bat aspergarria baina.

Euskarak, urte gutxitan, arlo guztietara bat-batean zabaldu behar izan du. Eskola eta unibertsitate zientzien adar guztietara, prentsa idatzira eta ikus-entzun guztietara, zine, irrati, telebista eta denera. Ez dago gairik, norbaitek egunero landu behar ez duenik. Halako filmean, halako dokumentalean, halako albistean, halako kongresu baten itzulpen lanean, halako nonahi, hitz batez, gairik arruntenak nahiz espezialduenak datozkizu mahaira, eta nola edo hala, ondo edo txarto, aurrera bota behar dituzu. Baina ez duzu noranahi botatzen, euskaldunen begira eta belarrira baizik. Zirkuitoa sortzen da, eta hori ontzen edo okertzen joateko tresna nagusietako bat hiztegia da. Hiztegi osorik eta fidagarririk ez badago, zirkuitoa bere kasa ibiliko da, hots, bere kasa higatuko da. Bat asmatu eta lau izorratuko ditu. Lana hainbeste kosta eta gero, hondatzaile izan beharra ez lizateke bat ere gozagarri. Idazleak nahi duena esan dezake, zailtasunak inork igarri gabe saihes ditzake. Inork ezin du jakin idazleak zenbat ezin ezkutatu dituen. Baina euskararen langileek dagokien edo datorkien hura adierazi behar dute. Ez daukate eskapurik, traizioa eginez ez bada.

Eman ditudan konparazioak gaur desfasatuak daude, bitartean ELHUYAR HIZTEGIA, *Castellano-vasco* eta 3000 HIZTEGIA, *Castellano-Euskara* argitaratu baitira. 3000 HIZTEGIA-k, aipatu bezala, "*45.000 hitz aukeratu, 65.000 adiera eta 30.000 adibide*" dio. Liburu berean bi hiztegi (Euskara/Gaztelania eta Gaztelania/ Euskara) daudela kontuan eduki behar da. Ni *Gaztelania/Euskara*-rekin konparatzen ari naiz, eta honek 676 orrialde hartzen ditu. Orrialde bakoitzaren batezbestea 50 hitz edo sarrera jorik, 33.800 irteten da. 60 sarrerako batezbestetik 40.560 irteten da. Luzeegi ez dut zenbatu, baina batezbestea orrialdeko 50etik hurbilago egongo dela uste dut, 60tik baino.

ELHUYAR HIZTEGIA-k "*83.000 sarrera, 120.000 adiera, 16.000 azpisarrera*" dio, baina hemen ere bi hiztegi (Euskara/Gaztelania eta Castellano-Vasco) datozela kontuan eduki behar da. Konparatzen ari naizen





*Castellano/Vasco*-ak 698 orrialde hartzen ditu. Batez beste, orrialdeko 60 sarrera jorik, 41.880 irteten da. Orrialdeko 70 jorik, 48.860. Orrialdeko 80 jorik, 55.840. Hiztegi honek leku-izenak eta pertsona-izenak ere sartzen dituela kontuan harturik, hitz arruntetan 50.000ren ingurutik hurbilago ibiliko dela uste dut, 55.000tik baino.

Azkenik, ZEHAZKI HIZTEGItik ere antzeko kalkuluak irteten zaizkit.

Zenbaki hauetatik ateratzen denez, hiztegi berriok ere saiakera honetan planteatzen den osotasunetik urrun daude oraindik. Hiru hiztegiak bat eginik ere, ez gara inola iristen 60.000ra.

## *Egikera teknikoa*

Lanaren alde funtzionalak eta sozialak alde batera utzirik, gatozen orain egintza teknikora, auziaren korapilo gordianora. Lehenik, pare bat gauza negatiboki planteatuko ditut, hots, erdal-euskal hiztegietan ugariegi ikusten diren eta ikusi behar ez direla uste dudan akatsak. Edo ezintasunak, agian, baina noizbait ahal izatea eskatzen dutenak.

1) Euskal hitz bat erdarazko hainbat eta hainbat hitzen ordain agertu ohi da.

Adibidez, '*kendu*' aditza erdal aditz hauei guztiei paretuko zaie:

KENDU: *Quitar, eliminar, privar, arrancar, suspender, eximir, derogar, abolir, suprimir, exceptuar...* eta auskalo zenbat gehiagori.

BATASUN: *Unión, unidad, unificación, relación, correlación, armonía, asociación, enlace, nexo, comunión, interacción...*

LURRALDE: *Zona, distrito, territorio, país, región, comarca, cantón...*

Argi dago jokaera hau ahal den guztia zuzendu behar dela. Lagunarteko solas zehazgabean uler daiteke, baina ez zehaztasuna eta mugapena eskatzen duen hiztegian. Hitzak ez dira gutxi gorabehera definitu behar.

2) Hitz gehienak ez dira izaten ale isolatuak, familiaka antolatuak baizik. Erro batetik hantxe datozke kontzeptu beraren kategoria ezberdinak: aditza, izena, aditz-izena, adjektiboa, adberbioa, eta abar. Euskaraz, batasun hori maizegi sakabanatu ohi da. Hona hiztegi bateko zenbait adibide:

*Conmemorable*: Gogoangarri.
*Conmemoración*: 1) Betegintzarre. 2) Oroipen, oroitzarre.
*Conmemorar*: Ospatu.
*Conmemorativo*: Gomutagarri, oroitgarrizko.

*Impaciencia*: Pazientziarik ez, inpazientzia, ezinegon.
*Impacientarse*: 1) Kezkatu, arduratu, pastikatu. 2) Berantetsi.
*Impaciente*: Astigabe, pairugabe.

*Impiedad*: Erlijiogabetasun.
*Impío*: Erlijiogabe(ko).
*Piadoso*: Jainkotiar, elizkoi.
*Piedad*: Urriki, pietate.

*Impotencia*: Ezintasun, ezin, inpotentzia.
*Impotente*: Indargabe / Ziztro, inpotente.
*Potencia*: Potentzia / Ahalmen.
*Potente*: Ahaldun, ahaltsu.
*Potenciar*: Potentziatu, indartu.

*Acceder*: -ra heldu.
*Acceso:* Sarbide, sarrera, ate, ailegabide, irispide, eskuraketa.
*Accesible:* Eskurakoi, eskuragarri, helkor, ailegagarri.
*Inaccesible:* Helezin.

*Concebir:* Sortu.
*Concepción:* Kontzepzio / Sorkunde, sortze.
*Concepto:* Kontzeptu.
*Inconcebible:* Pentsaezinezko.

*Actividad:* Ekintza, aktibitate, aktibotasun.





*Actibo:* Aktibo / Ekintzakor, ekinkor.
*Activar:* Aktibatu.
*Inactivo:* Geldi, geldo, lolo.
*Inactividad:* Gelditasun, geldotasun, ihardueraririk ez.

*Defender:* Alde egin, defendatu, aldeztu.
*Defensa:* Defentsa / Babeskuntza.
*Defensivo:* Defendatzeko, defendagarri.
*Defensor:* Aldeztaile, defendatzaile.
*Indefenso:* Babesgabe(ko).

Nabarmen dago erdarazko hitzen senidetasuna eta euskarazko ordainen dispertsioa. Aitor dut akatsa salatzea konpontzea baino errazago dela, baina ahalegindu beharko da, ezta?

Ideia hori zehazkiago eta argiago azaltzeko, adibide bat garatuko dut. Har dezagun gure inguruko erdaren latinetik harako 'frekuentzia' kontzeptua. Adiera batzuetan nahitaez, eta denetan ere sinonimo gisan, mailegua onartzeko eragozpenik bat ere ez daukat, noski. Baina euskarak baditu kontzeptu hori adierazteko moduko hitzak. Politen, argien eta laburrena, agian, MAIZ.

Ezertan hasi aurretik, dakusgun zer familia osatu behar den kontzeptuaren inguruan. Gaztelaniaz, aipatu erdaretan bezala, sei bai, behintzat: *frecuente, frecuencia, frecuentar, frecuentación, frecuentativo, frecuentemente*. Gehi daiteke *'frecuentador'* ere. Euskaraz, abiapuntua ez litzateke erdarena, adberbioa bera baizik: MAIZ. Erdaraz, adjektibotik dator adberbioa: *frecuentemente*. Honela osa daiteke familia, euskaraz: *maiz, maiztu, maizte, maiztasun, maizko-maizkor-maiztar-maiztun-maiztaile*. Gero badira esamoldeak ere: *maiz ibili/joan/izan*, eta abar. Ahal dela, kontzeptua hitz bakarrez adierazi behar da, ez definizioekin. Bost adjektibo posible jarri ditut, lau *maiz*-etik hara, eta bat (*maiztaile*), aditzetik. Horiekin, gutxienez, hiru erdal adjektibo adierazi behar dira: *frecuente, frecuentativo, frecuentador*. Bada *maiztasun* izenetik harako adjektibo posible bat ere, *maiztasunezko*. Erdarazko *frecuentativo* adjektiboaren ordaintzat, hiztegietan *maiztasunezko* dakust. Ez dago gaizki, baina bai luze. Adberbiotik harako izenetik barik (*maiztasun*),

abiapuntutik bertatik (*maiz*) hasiz gero, hor dugu, adibidez, *maizkor*. Bi silaba bakarrik, eta, hain zuzen, maiztasunera joera horixe markatzen duena. Kontzeptu markagabetzat *maizko* utzirik ('frecuente'), *maiztun* (edo *maiztar*) adjektibo markadunak 'frecuentador' adieraz dezake. *Maizte* 'frecuentación' izan daiteke.

Nire asmoa ez da orain hiztegiko sarrera-sorta bat erabakitzea baizik nabarmentzea abiapuntu bakarretik osatu behar dela lerro 'guztia, argi eta bereiztuki'. Honakoa izan daiteke lerro definitiboa: *maiz, maizkor, maiztasun, maiztu, maizte, maiztun*. Betoz gero sinonimoak (*sarri, naro, usutasun*...), lerrokide bakoitzari independenteki gehi dakizkionak, baita aipatu esamoldeak ere. Baina lerro edo familia oso bat hitz bakarretik argi eta ahalik laburren hornitzen saiatu behar da. Alderantziz esanda, familiaren dispertsioa saihestu behar da, gutxienez, gure inguruko erdaren mailan, eta ahal denean, hobeto.

3) Sarritan, hitz baten ordain-hitza barik, hitz horren definizioa aurkitzen duzu.

*Predisponer:* Aldez aurretik halako jarrera hartu/harrarazi... (Elhuyar).
*Predisposición:* Aldez aurretik halako jarrera izate/hartze...
*Insistente:* Esan eta esan aritzen dena, etengabe ari dena, gauzak behin eta berriz esaten dituena...

Forma hauek, hitzen itzulpenak barik, hitzen azalpenak dira. Esaldi osoak.

## *Hitz komunen ondarea*

Hona hemen euskararen arazorik agian handiena, oraindik motelki, koldarki planteatu ohi dena, eta inola ere konpondu ez dena. Teorian defendatu eta onartu ohi da maileguak hartzeko dudarik ez dela izan behar hitz 'kulto' edo 'teknikoetan'. Zeintzuk dira eurak? Adibideak jartzean, hor joaten dira betiko *telefono, mekanika, kosmo, robot, atomo, energia, ideia, sinkronia,* eta abar. Honelako hitzak ehundaka dira, noski. Eta, beti ere, jatorri grekodunak badira, lasaiago gelditzen garela dirudi.





Auzia ahul eta motz planteatzen dela uste dut. Hitz kulto edo teknikoen presuntzioak eremu murritzegia atzematen du, kalifikazio hori orokorregia, zehaztasun gutxiegikoa baita. Zuzenen eta praktikoen deritzodan irizpidea hitz *'komunak'* da. Zeintzuk hizkuntza hartu behar ditugu komuntasunaren errefentziatzat? Gutxienez, gaztelania, frantsesa eta ingelesa. Hiru hizkuntza horien inguruan, gu gauden mendebal eremua ondo ordezturik dagoela esan daiteke, bertan sartzen baitira katalana, galegoa, portugesa, italiera eta, hein batean, beste batzuk ere, suposatzen dut. Uler bedi hemendik aurrera eta, oro har, saiakera guztian, 'Europa' diodanean, eremu handi horri nagokiola, nahiz eta jakin Europa osoa, tradizionalki,ez dela hori izan, eta are gutxiago, oraingo Europar Batasuna. Aipamen bakoitzean ezingo naiz ibili zein Europa-zatiz mintzo naizen zehazten.

Irizpide zehatzago eta zabalago horretan, hitz kultoen eta teknikoen eremua ia automatikoki inkluditurik egongo da, hizkuntza horiek ere grekotik eta latinetik harako ekarriaren gainean eraikiak baitira, batzuk zuzenki, latinkumeak izaki, eta besteak kulturalki, hizkuntza anglosaxoiak bezala. Baina hori baino askoz gehiago izango da. Hizkuntza horiek konpartitzen dituzten hitzetan, euskarak irtenbide erraza dauka, edo behar luke: delako hitz baten '*ordain argirik eta bereizirik*' ez badago, hitz komuna hartu. Hitz komuna ez denean, eta hala ere, euskarak ordain argirik ez daukanean, zein hizkuntzatatik mailegatu pentsatu beharko da. Edo, agian, euskararen barrutik hitz berri bat sortu.

Inguruko hizkuntza hain ezberdin eta sendoek komunki daukatena euskara bezalako hizkuntza txiki eta ia agoniko bat bere baitatik asmatzen hasteak ausarkeria alaiegia dirudi. Horrek ez du inola ere esan nahi neologismoen baliabidea ukatzen dudanik. Baina, irizpide orokor gisan, gure inguruko hizkuntza indartsuek mailegatzeko eskrupulurik ukan ez dutena euskarak saihesteari kamuskeria deritzot. Tamalez, horixe egin dugu. Zer lortu da? Hizkuntza guztia deskolokatzea. Indefinizio etsigarria. Anbiguotasun nekagarria. Azkenean, auzia lehen bezain airean gelditzen da, baina askoz nahasiago. Eta auzi izugarri garrantzitsua deritzodanez, lasai eta luze destripatzen saiatuko naiz.

Hiru hizkuntza hartuko ditut erreferentzia gisan: frantsesa, espainola eta ingelesa. Hiztegia burutzean, alemanari ere begiratu beharko

zaio –eta, agian, gehiagori–, baina saiakera honen helburua aipatu hiru hizkuntzokin sobera azaltzen eta betetzen da, aipatu beste hizkuntzak ere (portugesa, katalana, galegoa, italiera) komuntasun berean sartzen baitira. Frantsesa eta espainola euskararen lurralde berean eta gainean daudelako, eta ingelesa, latinkumea ez izanaz gainera, gure mendebal kokaguneko erreferente nagusia delako.

Lehenik eta behin, arestian agerturiko jokaera bat gogoratuko dugu. Hizkuntza horiek, normalean (ez beti, noski, baina bai gehienean), hitz batetik harako maila gramatikal guztiak erroaren batasunean garatzen dituzte: *estar, estable, estancia, estación, estabilidad*... Batasun horrek aurrizkiekin ere jarraitzen du: *inestable, inestabilidad*... Euskaraz, hitzen ordainak banaka erabakitzean, batasun hori sarritan hausten da, oso jatorri ezberdineko hitz-familiak osatuz. Bestalde, hitz baten euskal ordaina pentsatzean, ez da aurreikusten kate guztia nola geratuko den. Har dezagun adibidetzat FORMA hitza, eta ikus nolako konstelazioa osatzen duen hizkuntza bakoitzean:

| GAZTELANIA | FRANTSESA | INGELESA | KINTANA | L.M.MUGIKA |
|---|---|---|---|---|
| Forma | Forme | Form | Forma, itxura, eite | Eite, era, tankera |
| Formación | Formation | Formation | Erakuntza, hezkuntza, formazio | Eraketa, moldaketa / Hezketa |
| Formador | Formateur | | | Eratzaile, moldatzaile / Hezle |
| Formal | Formel | Formal | Formal, benazko | Formal, zentzudun, funtsezko |
| Formalidad | Formalité | Formality | Formaltasun | Funts, fulamendu / Benetasun |
| Formalismo | Formalisme | Conventionelism | Formalismo | Formalismo |
| Formalista | Formaliste | Formalist | Formalista | |
| Formalizar | Formaliser | To formalize | Formaldu, eratu, itxuratu, taiutu | |





| | | | | |
|---|---|---|---|---|
| Formar | Former | To form | Formatu, eratu, itxuratu, taiutu | Eratu, moldatu / Hezi |
| Formativo | Formatif | Formative | Formagarri, eragarri, hezgarri | Hezgarri |
| Formato | Format | Format | Formato, taiuera | Tankera |
| Conformación | Conformation | Forme, shape | Moldura | Taxu, itxura, tankera |
| Conformar | Conformer | To conform | Konformatu | Taxutu, antolatu, eratu |
| Conforme | Conforme | Agreed | Konforme, ados, batera | Egoki / Ahobateko, gogaide, irizkide |
| Conformidad | Conformité | Conformity | Adostasun, konformitate | Konformitate |
| Deformación | Déformation | Deformation | Itxuragabetze, deformazio | Desitxurapen, deseraketa |
| Deformar | Déformer | To deform | Itxuragabetu, deformatu | Desitxuratu, deseratu, markestu |
| Deforme | Difforme | Deformed | Itxuragabe, deforme | Desitxurazko, deserazko, markets |
| Deformidad | Difformité | Deformity | | Desitxuratasun, deseratasun |
| Información | Information | Information | Informazio, jakingarri | Informaketa |
| Informador | Informateur | Informant | Informatzaile, berriemale | Informatzaile, berriemale |
| Informal | | Informal | Ezformal, informal | Ezformal, informal |
| Informalidad | | Informality | Ezformaltasun, informaltasun | Ezformaltasun, informaltasun |
| Informante | Qui informe | Informant | Informatzaile | Informatzaile, berriemale |

| | | | | |
|---|---|---|---|---|
| Informar | Informer | To inform | Informatu | Informatu |
| Informativo | D'information | Informative | Informagarri | Informakari / Informakor |
| Informe | Informe | Shapeless | Itxuragabe(ko), formagabe(ko) | Itxuragabe, gisagabe |
| Reforma | Réforme | Reform | Erreforma | Berrizte, berrikuntza |
| Reformable | | | Erreformagarri | Zuzengarri, berrigarri |
| Reformador | Reformateur | Reformer | Erreformatzaile | Berritzaile, zaharberritzaile |
| Reformar | Reformer | To reform | Erreformatu | Eraberritu / Berritu, berriztatu |
| Reformatorio | Qui reforme | Reformatory | Erreformategi | Zuzenkor |
| Reformista | Réformiste | Reformist | Erreformari, erreformista | Erreformista, eraberritzaile |
| Transformación | Transformation | Transformation | Eraldakuntza, transformazio | Eraldaketa, aldakuntza |
| Transformador | Transformateur | Transformer | Transformatzaile, transformagailu | Eraldatzaile |
| Transformar | Transformer | To transform | Eraldatu, formaldatu | Eraldatu, bestelakotu, itxuraldatu |
| Uniforme | Uniforme | Uniform | Uniforme | Erabateko, eraberdineko |
| Uniformemente | Uniformément | Uniformly | | Erabatez, eraberdinez |
| Uniformar | Uniformiser | To make uniform | Bateratu, uniformatu | Batu, bateratu |
| Uniformidad | Uniformité | Uniformity | Uniformetasun, baterakotasun | Erabatasun |
| Disconforme | Qui n'est pas conforme | Not agree | Deskonforme, konformagaitz | Desados, desakort, ezakort |
| Disconformidad | Non-conformité | Disagreement | Deskonformetasun, konformagaiztasun | Desadostasun, desakortasun |





Zerrendan berrogeita bi hitzen korrespondentziak datoz. Erabili ditudan erdal eta euskal hiztegiak zabalera berdinekoak ez izanik, batzuek besteek baino hitz gehiago dakarte familia berean. Gehienetan ez zetozenak ez ditut jaso, baina sorta garrantzitsuena hauxe da duda gabe, eta axola zaigun konparaziorako, nahikoa eta sobera.

Nahi ez dudan ondoriorik edo eragozpenik inork jar ez dezan, hizkuntza bakoitzak hitz berdinari ez dio beti adiera bera ematen. Eta adiera batean edo gehiagotan bat etorri arren, gero hizkuntza bakoitzak hitzari bere ibilera eragiten dio, osoan harturik, garapen ezberdinak burutuz. Baina abiakera denetan berdina edo oso berdintsua da. Zerrenda honetan ikusarazi nahi dudana da hitz bakoitzaren forma berdinak hizkuntza bakoitzean ageri diren ala ez, nahiz eta, batzuetan, adierak ez bat etorri.

Ohar hauen ondoren, argi dago hiru erdaretan ia kointzidentzia osoa dagoela. Kintanarena nahiko hurbil dago hiru erdaretatik, baina hainbat hitz gehigarri sartzen ditu, sarritan hitz komuna bigarren edo hirugarren jarriz. Mugikarena, azkenik, ia erabat urruntzen da eredu komunetik. Oinarrizko 'forma' bera ere ez du hartzen.

Bi ondorio larri datoz hemendik. Batetik, bi euskal hiztegi hain ezberdin edukitzea. Eta beste batzuk hartzen badituzu, askoz ezberdinago. Nori egin behar dio jaramon egunero euskararekin lanean dihardenak? Eta bestetik, hainbeste euskal hitz ezberdin 'forma' hitzaren zirkuitoan sartzea. Hor ageri dira: *eite, itxura, tankera, era, eratu, moldatu, hezi, hezkuntza, taiutu-taxutu, taiuera, moldura, ahobateko, gogaide, irizkide, itxuragabe, itxuragabetze, desitxuratu, markestu, berriemale, berritze, berrikuntza, berriztatu, eraberritu, zuzengarri, zuzenkor, berritzaile, erabateko, batu, bateratu, baterakotasun, eraldatu, itxuraldatu, aldakuntza...*

Baina hori ez da koskarik handiena, zeren gero hitz horiek beste kontzeptu batzuen zirkuitoan ere sartuko baitira, hitz bakar bati dozenaka adiera erantsiz, gutxi gorabeherako berdintasunean oinarriturik. Azkenean, hiztegi osoa pasatu ondoren, hizkuntza guztia deskolokaturik aurkitzen duzu. Eta, orain, berrordenatzea benetan zaila da, nahasmenak luze eta norabide ezberdinetan korritu baitu, hiztegietan, metodoetan, eskola-liburuetan, prentsan, literaturan.

Konparazioak gaurkotzeko, geroagoko beste hiru hiztegiekin osatuko dut koadro bera, bide batez, hiztegigintzaren eboluzioa ere emango diguna. Ez ditut euskal hiztegi bakoitzak sarrera bakoitzera dakartzan ordain eta adiera guztiak sartu, zerrenda luzeegiak saihestearren.

| GAZTELANIA | FRANTSESA | ELHUYAR | 3000 HIZTEGIA | ZEHAZKI |
|---|---|---|---|---|
| Forma | Forme | Forma, itxura | Eite, itxura, tankera, taxu, jas | Forma, itxura, molde, era |
| Formación | Formation | Eraketa, osaketa, osatze, sortze, sorrera | Eraketa, erabide, osotze, antolaketa, erakuntza | Eratze, eraketa, osaketa |
| Formador | Formateur | (Ez dator) | Eratzaile, hezitzaile, antolatzaile | (Ez dator) |
| Formal | Formel | Formal, formazko, forma- | Erazko, formal, azaleko | Forma-, formal |
| Formalidad | Formalité | Formalitate, formaltasun, betebehar | Formaltasun, zintzotasun, formalitate | Formaltasun, formalitate, betebehar |
| Formalismo | Formalisme | Formalismo | Formalismo | Formalismo |
| Formalista | Formaliste | Formalista | Formalista | Formalista |
| Formalizar | Formaliser | Formalizatu, gauzatu, legezko egin | Formalizatu, arautu, gauzatu | Formal bihurtu, formalizatu, gauzatu |
| Formar | Former | Eratu, itxuratu, osatu, taxutu | Eratu, moldatu, formatu, taxutu | Sortu, eratu, osatu, formatu |
| Formativo | Formatif | Hezigarri, heziketa-prestakuntza- | Prestakuntza-prestakuntzazko | Eratze-, osatze-, hezigarri |
| Formato | Format | Formatu | Formatu, taxuera, izari, neurri | Formatu |
| Conformación | Conformation | Osaera, osaketa, konformazio | Moldura | Tankeratze, taxutze, forma, egitura |





| | | | | |
|---|---|---|---|---|
| Conformar | Conformer | Osatu, egokitu, konformatu | Araberatu, forma eman, konformatu | Tankeratu, taxutu, egokitu, osatu |
| Conforme | Conforme | Ados, konforme dena, bat datorrena | Araberako, dagokion, arauzko, konforme | -en arabera, ados, konforme |
| Conformidad | Conformité | Adostasun, onespen, baiezko, etsipen | Onespen, konformitate, kidetasun, adostasun | Adostasun, bat etortze, onespen |
| Deformación | Déformation | Deformazio, desitxuratze, itxuragabetze | Itxuragabetze, deformazio, desbistatze | Desitxuratze, itxuragabetze, deformazio |
| Deformar | Déformer | Deformatu, itsustu, desitxuratu, desbistatu | Itxuragabetu, deformatu, desbistatu, zatartu | Deformatu, desitxuratu, markestu |
| Deforme | Difforme | Desitxuratu, itxuragabe, deformatu | Itxuragabe, desitxuratu, zatar, karkail | Itxuragabe, eitegabe, maker |
| Deformidad | Difformité | Forma-anormaltasun, itxuragabetasun | Itxuragabetasun, markets, markestasun | Itxura/ eitegabetasun, makertasun |
| Información | Information | Informazio, argibide, argitasun | Informazio, jakingarri, argibide | Argibide, jakingarriak, informazio |
| Informador | Informateur | Berriemaile, informatzaile | Informatzaile, berriemaile, jakinarazle | Berriemaile |
| Informal | | Infromal | Informal | Infromal |
| Informalidad | | Informaltasun, formalitaterik eza | Informaltasun, formaltasunik eza | Formaltasun ez, seriotasun ez |
| Informante | Qui informe | Berriemaile, informatzaile | Informatzaile, berriemaile, txostengile | Berriemaile, informatzaile |
| Informar | Informer | Informatu, berri eman, jakinarazi | Berri eman, informatu, jakinarazi, azaldu | Berri eman, informatu, jakinarazi |

| | | | | |
|---|---|---|---|---|
| Informativo | D'information | Informatzaile, informazio- | Informagarri, berriemaile, informatibo | Argibide-, informazio- |
| Informe | Informe | Itxuragabe, eragabe, formagabe | Itxuragabe, eragabe, moldegabe | Formagabe, moldegabe, eitegabe |
| Reforma | Réforme | Berritze, berrikuntza, erreforma, aldakuntza | Eraldaketa, berrikuntza, erreforma, eraberritze | Erreforma, eraberritze |
| Reformable | | (Ez dago) | Eraldakor, berriztakor, erreformakor | (Ez dago) |
| Reformador | Reformateur | Berritzaile, berriztatzaile, erreformatzaile, eraberritzaile | Eraldatzaile, berritzaile, erreformatzaile | Erreformatzaile, eraberritzaile, erreforma- |
| Reformar | Reformer | Berregin, berritu, erreformatu | Eraldatu, berritu, erreformatu | Erreformatu, eraberritu, berritu |
| Reformatorio | Qui reforme | Erreformatorio | Erreformategi | Erreformatorio, zenzatzeko etxe |
| Reformista | Réformiste | Erreformista | Erreformista | Erreformista |
| Transformación | Transformation | Transformazio, eraldatze, bihurtze | Transformazio, eraldakuntza, bestelakatze | Eraldatze, bihurtze, formaldatze |
| Transformador | Transformateur | Transformatzaile, eraldatzaile | Eraldatzaile, transformatzaile | Eraldatzaile |
| Transformar | Transformer | Aldatu, itxuraldatu, transformatu | Transformatu, eraldatu, aldarazi | Eraldatu, itxuraldatu, formaldatu, bestelakotu |
| Uniforme | Uniforme | Uniforme, beti berdin | Berdintsu, era bereko, forma bereko | Beti- bateko, era bereko, uniforme |
| Uniformemente | Uniformément | (Ez dago) | Era berean, berdintsuki, uniformeki | Beti bat |





| | | | | |
|---|---|---|---|---|
| Uniformar | Uniformiser | Uniformea ezarri, uniformatu, batu, bateratu | Berdindu, bateratu, uniformatu | Berdindu, uniforme bihurtu, uniformetu |
| Uniformidad | Uniformité | Berdintasun, uniformetasun | Erabatekotasun, uniformetasun, terrenteria | Betibatekotasun, uniformetasun, berdintasun |
| Disconforme | Qui n'est pas conforme | Ados/konforme ez, bat ez datorrena | Desakort, deskonforme, ezados, ados ez | Konforme ez dagoen, ados ez datorren |

Argi dago koadro honek, lehen koadroarekiko, eboluzio handia erakusten duela. Hala ere, planteatzen ari naizen irizpideetatik urrun ikusten dut. Oraindik egoera nahiko lanbroan gabiltza, eta ibiliko gara, erdal-euskal hiztegi oso, zehatz eta nazional askoz aurreratuago bat ez daukaguno. Eta helburuaren zailtasuna ez dut hainbeste ikusten langintzan bertan, irizpideetan eta araberako metodoan baizik.

Eman dezagun hiru erdaren adibide gehiago. Hitzak, zutabeka barik, jarraian jarriko ditut, paralelismoa bakoitzak egitea erraza baita.

FIGURA

Gaztelania: *Figura, figurable, figuración, figuradamente, figurado, figurante, figurar, figurativamente, figurativo, figurín, figurón. Configuración, configurar. Prefiguración, prefigurar.*

Frantsesa: *Figurant, figuratif, Figuration, figure, figuré, figurement, figurer, figurin. Configuration, configurer. Préfiguration, préfigurer.*

Ingelesa: *Figurative, figuratively, figure, to figure, figurehead, figure, skating, figurine, configuration. Prefiguration, to prefigure.*

H. 2000: *Irudi-figura-itxura, begitazio-irudipen-figurazio, begitandu-iruditu-figuratu, irudikorki, irudikor, iruditxo, figurin, handiputz. Egitura-itxura-itxuraketa, itxuratu. Aitzinirudi.*

LM.Mugika: *Iduri, iduripen, iruditu-antzeman, iduriz, idurizko. Itxuratu, Aurreirudi, aurreiruditu.*

## DUCERE:

Gaztelania: *Abduccion, abductor. Aducción, aducir, aductor. Conducción, conducente, conducir, conducta, conductancia, conductible, conductividad, conductivo, conducto, conductor. Deducción, deduciente, deducir, deductivo. Inducción, inducido, inducidor, inducir, inductancia, inductivo, inductor. Introducción, introducir, introductor. Reducción, reducible, reducido, reducir, reductor. Seducción, seducir, seductivo, seductor. Traducción, traducible, traducir, traductor.*

Frantsesa: *Abduction, abducteur. Adducteur, adduction. Conductance, conducteur, conduction, conduir, conduite. Deductif, deduction, déduire. Inductance, inducteur, inductif, induction, induire, induit. Introducteur, introduction, introductoire, introduire. Réducteur, réductible, réduction, réduire, réduit. Séducteur, séduction, séduir, séduisant. Traducteur, traduction, traduire.*

Ingelesa: *Abduct, abduction, abductor. To adduce. To conduce, conducive, conduct, to conduct, conducted, conduction, conductivity, conductor, conductress, conduit. To deduce, deducible, to deduct, deductible, deduction, deductive. To induce, inducement, to induct, induction, inductive. Introduce, introduction, introductory. To reduce, reduced, reducible, reduction. To seduce, seducer, seduction, seductive, seductively.*

Hitz multzo hauetan, begira nolako paralelismoa dagoen hiru erdaretan. Frantsesez hiztegi txikiagoa erabili dut, eta horregatik da zerrenda laburragoa. Euskal hiztegietara jotzen baduzu, auskalo zenbat eta nolako hitzak sartuko diren zirkuitoan.

## FERO-FERRE:

Gaztelania: *Conferencia, conferenciante, conferenciar, conferir. Diferir, diferente, diferencia. Inferencia, inferir. Interferencia, interferir. Preferencia, preferente, preferentemente, preferible, preferir. Referencia, referente, referible, referir.*





Frantsesa: *Conference, conférer. Différer, différent, différence. Inférence, inférer. Interférence, interférer. Préférable, préférence, préférentiel, préférer. Référence, référer.*

Ingelesa: *Conference, to confer. To defer-differ, diferent, diference. To infer, inference, inferential, inferentially. To interfere, nterference, interfering. To prefer, preferable, preferably, preference, preferential. To refer, referable, reference.*

## PRES-PRIM:

Gaztelania: *Presión, presionar. Expresión, expresar, expresivo. Represión, represivo, represor, reprimir. Impresión, impresionable, impreso, impresor, imprenta, imprimir. Compresa, compresión, compresible, compresivo, compresor, comprimir. Supresión, suprimir.*

Frantsesa: *Presser, pression. Exprimer, expression, expressive. Répression, répressif, réprimer. Impression, impressionable, imprimable, imprimé, imprimer, imprimerie, imprimure. Compresse, compresseur, compression, comprimé, comprimer. Suppresion, supprimer.*

Ingelesa: *To press, pressing, pressure. To express, expression, expressive. To repress, repressed, repression, repressive. Inpression, to imprint, impress, impressive, impressionable, impressed. To compress, compress, compressed, compression. To suppress, suppressed, suppression, suppressive, suppressor.*

## SENT-SENS:

Gaztelania: *Sentir, sentido, sentimiento, sentimental, sentible, sensible, sensitivo, sensorio, sensibilidad. Asentir, asentimiento, asenso. Consentido, consentidor, consentimiento, consentir, consenso. Disensión, disenso, disentimiento, disentir. Presentir, presentimiento. Resentido, resentimiento, resentir.*

Frantsesa: *Sentir, sentiment, sentimental, sensible, sensibilité, sensitif, sensoriel, sensorium. Assentir, assentiment. Consentir, consensus, consentement, consensuel. Dissension, dissentiment, différer. Pressentiment, pressentir. Ressentiment, ressentir.*

Ingelesa: *To feel, to sense, sentiment, sense, sentimental, sentient, sensitive, sensitivity, sensibility. To assent, assent. Consensus, to consent to, consent. Dissent, to dissent. Presentiment.*

Sorta hauetan guztietan, euskaraz nolako matazak egin ditugun azaltzerik ez dago. Eta egiten ari. Adibide luzeegiak iruditu bazaizkizu, mostra ñimiño bat besterik ez da izan. Hiztegi guztia horrelakoz josita dago goitik beheraino. Jarraian, ingeles hiztegitik hitz zerrenda bat emango dut, irradan hautatua, hiru erdaretan multzo berberak eduki ditzakeela berehalaxe ohartzeko modukoa.

*Abandon-abandonment, abase-abasement, abate-abatement, abbot-abbey, abbreviat-abbreviation, abdicate-abdication, aberrant-aberration, abhor-abhorrence, abject, abjure, able-ability, abnegation, abolish-abolishment, abominate-abomination, abort-abortion, abrasion-abrasive, abrogate-abrogation, abrupt-abruptness, absent-absence, abscess, absolute, absolve-absolution, absorb-absorption, abstain-abstention, abstract-abstraction, abstruse, absurde-absurdity, abundance-abundant, abuse-to abuse, abyss-abysmal, academic-academy, accede-access, accelerate-acceleration, accent-accentuate, accept-acceptance, accesory, accidence-accident, acclaim-acclamation, acclimate-acclimatize, accommodate-accommodation, accompany-accompaniment, accompice, accomplish-accomplishment, accord-to accord, account-to account, accredit, accumulate-accumulation, acuse-acusation, accustom-custom, acetic, acetone, acetylene, acid-acidity, acolyte, aconite, acoustic, acquiecence, acquire-acquirement, acrimony, acrobat, act-action, active-activity, actual-actuality, actuate, acute-acuteness, adapt-adaptation, addict-addiction, add-addition, adduce, adequate, adhere-adherence, adhesion, adipose, adjacent, adjetive, adjudicate-adjudication, adjust-adjustement, adjutant, administer-administration, admire-admiration, admit-admission, admonish-admonition, adolescent-adolescence, adopt-adoption, adore-adoration, adorn-adornment, adulate-adulation, adult, adulterate- adulteration, advance-advancement, advantage, advent, adventure.*

Hona 151 hitz, denak jarri gabe, gehienean, aditza eta aditz-izena bakarrik jaso baititut. Denak jasotzera, zenbat izango ziratekeen begiraturik, 353 kontatu ditut, izen bereziak kenduta. Eta guztia A letraren lehen zortzi orrialdeetan bakarrik. Darabildan *Collins*-en hiztegiak 610 orrialde dauzka.





Beraz, denean proportzio horretan jarraitzera, 26.900 hitz ateratzen dira. Letra batzuetan beste batzuetan baino proportzio handiagoa egongo da, eta baliteke ugarietako bat A izatea, hemen A, AB eta AD aurrizkiak gertatu baitzaizkigu. Pentsatzekoa da *con, in, pre, re, sub, un* aurrizkidun hitzetan ere, proportzio handia egongo dela. Beraz, proportzio hori dezente jaitsita ere, hamabost milatik gorako hitz sortatik ez gara libratzen. Eta *Collins* ez da oso hiztegi lodietakoa ere. Darabildan gaztelaniazko *Casares*-ena handiagoa da. Baina gaztelaniaz, ingelesez nahiz frantsesez, badaude askoz hiztegi mardulagoak, hiztegi espezialduetan sartu gabe.

Euskaraz *Collins*-en edo *Casares*-en pareko erdal-euskal hiztegi bat ez litzateke gutxi. Hiztegi horietan, hogei bat mila hitz komunekin topo egingo dugu. Ez dira ehunka batzuk, ezta milaka batzuk bakarrik ere, hitz 'kultoen' eta 'teknikoen' azpian suposa daitezkeenak. Gure inguruko erdarek amankomun daukaten altxorra askoz zabalagoa da. Euskarak zer egin behar du?

Galdera horri erantzuteko, gaztelania eta frantsesa parte interesdunak izan daitezke, gure hizkuntza euren mende baitago. Gainera, euskara ez da latinkumea, hizkuntza horiek bezala. Ongi. Hor dago ingelesa, euskararen lurraldean nagusi ez dena, eta latinkumea ere ez dena. Hizkuntza horrek nola jokatzen duen, orientagarri izan dakiguke. Eta galdera berehalakoa da. Ingelesak, euskarak baino mila bider indar eta baliabide gehiago edukirik, hitz komunetan partaide izateko lotsarik ez badauka, zertan ari gara gu buruak apurtzen, irteera gabeko labirintoan bazter joka?

Ez uste ingelesaren gurmenak narabilenik. Esana dut alemanari ere begiratu beharko zaiola. Baita arestian aipatutako beste hizkuntza hurbilei ere: portugesa, galegoa, katalana, italiera, bretoiera... Hitz komunen altxorra baietz hortxe-hortxe ibili denetan berdintsu. Ez, agian, ingelesak darabilen zabaleran, baina bai euskarari ederki letorkiokeen heinean.

Norbaitek pentsa lezake hizkuntza horiek jakinik bezala mintzo naizela. Ez, noski, baina ez da goiz-kukua izan behar, ingelesak, frantsesak, italierak eta gaztelaniak egiten dutena besteek ere gutxi gorabehera egingo dutela suposatzeko. Eta egiten ez badute ere berdin dit, ez baitu auzia bat ere aldatzen. Gure kokaguneak ez dauka eskapurik. Gauden

lekuan gaude. Euskara zeintzuk hizkuntzen azpian eta zeintzuen ondoan dagoen edo egotea nahi genukeen argi dago.

Hauek honela, erreferentziatzat jarritako hizkuntzen hitz komunak gureak erebadirelaesatenarinaiz,euskarakordaingarbirikezdaukanean.Beraz,euskaraz arestiko hitz multzoetan datozen *figura-figuratu-konfiguratu-prefiguratu, aduzitu-konduzitu-deduzitu-induzitu-introduzitu-reduzitu-seduzitu-traduzitu, konferitu-diferitu-inferitu-interferitu-preferitu-referitu, presio-espresio-konpresio-inpresio-represio-supresio, sentitu-asentitu-konsentitu- disentitu-presentitu,* eta euron familiak; edo 'forma' koadroko *forma, formatu, formazio, konformatu, deformatu, informatu, erreformatu, transformatu, uniformatu,* eta euron familiak; edo azken zerrendako *abandonatu, abatitu, abdikatu, abjuratu, abominatu, abrogatu, abruptu, absente, absorbitu, abusatu, aklamatu, aktual, adaptatu, aduzitu, adjudikatu, adoptatu, adornatu, adoratu, adulteratu, adultu, abantzatu, abentura,* eta abar eta abar, printzipioz, euskal hiztegian sartzekoak dira.

Horrek ez du inondik ere esan nahi euskal hitzak eliminatu behar direnik, bakoitza bere gunean birkokatu baizik. Orduan lasai joka dezakegu. Ez daukagu *forma, figura, abominatu, transformatu*... hitzen euskal ordainik egokienen bila ehizan irten beharrik. Nahi badugu, arriska gaitezke geure hitz bati lerratze semantiko bat eragitera, edo neologismo bat sortzera, baina desesperaziorik edo asmamen arbitrarioen arriskurik gabe. Hitz horiei hizkuntza bakoitzak bere garapena emango dio, eta inguruan hantxe izango du sinonimo mordoa, hizkuntza bakoitzaren ahalmenen eta altxor propioaren arabera. Gaztelaniaz, Casaresen hiztegian, '*transformar*' datorren aditz sinonimoen sailean (*cambiar, mudar, modificar... alterar, demudar... transformar, transfigurar, transmutar*...), hirurogeita lau aditz eta hamasei esamolde kontatu ditut. Frantsesean eta ingelesean ez dira gutxiago izango. Ez dago, beraz, ezer galtzeko arriskurik.

Hitz komunak mailegatzeko irizpidetzat, "*euskaraz ordain argi eta bereizirik ez daukagunean*" esan dut. Descartesek ideientzat formulatu zuen irizpide bera aldarrikatzen dut hitzentzat. Haren "*ideia argi eta bereiziak*" bezala, hizkuntzan, hitzen "*ordain argi eta bereiziak*". Inguruko hizkuntzen hitz komun horiek euskarak ere behar ditu. Baina behar hori nola neurtzen da? Kontzeptu batzuk beharrezko ditugula ez dago dudarik;





adibidez, *forma, transformatu, adultu, deduzitu,* eta milaka. Baina, adibidez, *inexorable, inherente, inhalatu* beharrezko al ditugu? Kontzeptu batzuk materialak eta oso definituak dira: *atea, mahaia, begia, sudurra, ura, eulia*... Beste batzuk, ordea, immaterialak, abstraktuak dira, muga zehatzik gabeko eremuak, non hainbat hitz antzekok, bakoitzak bere ñabarduraz, eremua osatzeko zeregina daukan. Gaztelaniaz, *inexorable, impasible, inalterable, inconmovible, inmutable, imperturbable, impávido, impertérrito, indoblegable, intransigente,* eta beste hainbatek, eremu komun samar bat adierazten dute. Hala ere, bakoitzari bere partzela propioa edo definizioa ematen saiatuko da hiztegia. Horrelakoen bakoiztasuna, ordea, ez da *sudur* edo *tximinia* izenena bezain argia. Beharrezko al dira erdi sinonimo horiek denak?

Galderak ez dauka zentzu handirik, baina mailatze bat eginez, diogun hitzak daudela: nahitaezkoak, beharrezkoak, komenizkoak eta apaingarriak. Hizkuntzek denerik badaukate, denerik behar dutelako izango da. Denak dira beharrezko. Orduan, hitz komun beharrezkoetan ez ezik, ustez apaingarri soiletan ere zabal jokatzea da bidezko. Beraz, *inexorable* ere barne behar da, bere lagun *inpasible, urrikigabe, ikaragaitz, izugabe, bueltagabe, gupidagabe, pairugabe, ibikaitz, soraio,* eta abarrekin batera.

Lan honi lehen idazketa eman nionean, *Elhuyar Hiztegia* eta *3000 Hiztegia* ez ziren oraindik existitzen. Are gutxiago, Ibon Sarasolaren oraintsu samarreko *Zehazki Hiztegia*. Atal hau amaitzeko, beraz, hitz komunen zerrenda bat emango dut orain ingelesez, eta aipatu hiru hiztegi berriok, *Elhuyar Hiztegia, 3000 Hiztegiak* eta *Zehazki Hiztegiak* hitz bakoitzarekin zer egiten duten ikusi. Zerrenda ingelesez etorri arren, hitz hauek denak gaztelaniaz eta frantsesez komunak dira. Europako beste hizkuntza askotan ere hala izango direla suposatzen dut, denak ez bada, mordo bat.

Zerrendan, *bai* galderadunak esan nahi du delako erdal hitza beste zenbait euskal hitzen artean sinonimo bat gehiagotzat hartzen dela. *Ez* galderadunak esan nahi du oso adiera marginal batean onartzen dela. Batzuetan, bi hitz familiako ematen dira *-restrict/restriction-*, baina bai hauek eta bai bakarrik datozen gehienek euren familia ugariak osatzen dituztela kontuan eduki behar da. Gaztelaniaz, esaterako: *pasion, pasional,*

*pasionario, pasionero, pasionista, apasionar, apasionante, apasionado, apasionamiento, apasionadamente*... Zerrenda honek, beraz, beste zerrenda erreal askoz luzeago bat iragartzen du.

| INGELESA | ELHUYAR | H. 3000 | ZEHAZKI |
|---|---|---|---|
| Invent | Ez | Ez | Ez |
| Intervention | Ez | Ez | Bai |
| Invalid | Ez | Ez | Ez |
| Intermittent | Ez | Ez | Ez |
| Irritate | Ez | Ez | Ez |
| Mediokre | Ez | Ez | Ez |
| Monument | Bai | Bai | Bai |
| Native | Ez | Ez | Ez |
| Negligence | Ez | Ez | Ez |
| Obscene | Ez | Ez | Ez |
| Observe | Ez | Ez | Ez |
| Offend | Ez | Bai? | Bai |
| Oportune | Ez | Ez | Ez |
| Passion | Bai? | Ez? | Bai |
| Penetrate | Ez | Ez | Bai? |
| Perceive | Ez | Ez | Bai |
| Persistent | Ez | Ez | Ez |
| Possession | Ez | Ez | Ez |
| Precedent | Ez | Ez | Ez |
| Pretend | Ez | Ez | Ez |
| Prevail-prevalent | Ez | Ez | Ez |
| Reciprocal | Ez | Ez | Ez |
| Rectify | Ez? | Bai | Bai |
| Redact | Bai? | Ez | Ez |
| Redeem-redemption | Ez | Ez | Ez |
| Relate | Ez | Ez | Ez |
| Remit-remittent | Ez | Ez | Ez |
| Represent | Ez | Ez | Ez |
| Reproduce | Ez? | Ez | Bai |
| Repudiate | Ez | Ez | Ez |
| Rescind | Ez | Ez | Ez |
| Reside-resident | Ez | Ez | Ez |
| Restrict-restriction | Ez | Ez | Ez |
| Rude | Ez | Ez | Ez |
| Ruin (ruina) | Ez | Ez | Ez |
| Sanitation-sanitary | Ez? | Bai? | Ez |
| Secondary | Bai? | Ez | Bai? |
| Select-selection | Ez? | Ez | Ez? |
| Sequestrate | Ez | Ez | Ez |
| Sublime | Ez | Bai? | Bai? |
| Submarine | Ez | Ez | Ez |
| Supplement | Ez | Ez | Ez |
| Tact | Ez | Ez | Ez |
| Total | Ez | Bai? | Ez |
| Vanity | Ez | Ez | Bai |
| Verify | Ez | Ez | Ez |
| Defect | Ez | Ez | Ez |
| Deference | Ez | Ez | Ez |
| Examine | Ez | Bai | Bai |
| Exhibit | Ez | Ez | Ez |
| Expand-expansion | Ez? | Ez? | Ez |
| Expose-exposition | Ez? | Ez | Ez? |
| Final-finality | Ez? | Ez? | Ez? |
| Horrible-horror | Ez | Ez | Ez |





Berrogeita hamalau hitzotatik, *Elhuyar Hiztegiak* bakarra hartzen du garbi, sinonimo bat gehiagotzat hiru, eta zazpi, adiera marginal batean. Beste berrogeita hirurak ez ditu ezertarako hartzen. *Hiztegi 3000*-k hiru hartzen ditu garbi, sinonimo bat gehiagotzat lau, eta hiru, adiera marginal batean. Beste berrogeita laurak ez ditu batere hartzen. *Zehazki Hiztegiak* zazpi hartzen ditu garbi, sinonimo bat gehiagotzat hiru, eta bi adiera marginal batean. Beste berrogeita biak ez ditu batere hartzen.

Emandako zerrenda gure inguruko europar hizkuntza askoren zerrenda komuna da, bai hizkuntza latinoena, bai ingelesarena. Horren aurrean, euskarak, hain hizkuntza txiki eta ahulak, zer joera daraman ikusirik, ezin dut ekidin zerbaitetan oker gabiltzala susmatzerik. Jokoz kanpoko sentsazioa ematen dit. Hitz bat edo beste eztabaidatzekoa izan

daiteke, baina multzo osoari begiraturik, zaila da ezlurtar-konplexutik libratzea.

Auzia ez da horretan amaitzen. Erdal hitz horiei euskal ordainak ematean, soluzio berdinak edo berdintsuak emango balitzaizkie, gaitz erdi genuke. Okerrena da, hiztegitik hiztegira, diferentzia handiak ageri direla; eta ez dauka bestela izaterik. Behin enbor komuna errefusatuz gero, zaila da banaka kointzidentzia osoa lortzea. Ez dut ukatuko egin izan den aurrerapenik, baina gure inguruko hizkuntzen kontzeptu komun eta oso zehatz askotan, euskaraz, oraindik, dibagatzen ari gara.

Azken urteotan idazten ari naizen JOAN ZIREN zikloan, hiru izenburu dauzkat jadanik argitaratuak (*1. Dinosauroak horizontean, 2. Orain ezin naiz hil, 3. Olatu bat kuartelen gainetik*), eta ohitura hartu nuen, euskal hiztegietan ez dauden hitzak erabiltzean, 'bokabulario' batean jasotzen joateko, hitz hau berau barne. Gure inguruko erdaretan, antzekoak izan arren, oso hitz bereiziak dira 'diccionario' eta 'vocabulario'. Ingelesez, *vocabulary*; frantsesez, *vocabulaire*. ('Vocablo', berriz, ingelesez *vocable*, frantsesez *vocable*, eta alemanez ere hor dakust *vokabel*). Euskaraz, orain arte, bi hitzak *hiztegi* esanez konpondu behar izan dugu. Zergatik ez geuk ere bereizi *hiztegi* eta *bokabulario?* Ba, bokabulario horretan (*Dinosauroak horizontean* izeneko eranskinean ere badator beste zerrendatxo bat, A-tik aurrera), honelako hitzak agertzen dira, *Im*-etik aurrera:

Immediato: ing, fr.
Immemorial: ing, fr.
Immentsitate: ing, fr.
Imminentzia: ing, fr.
Immobilitate: ing, fr.
Immobilizatu: ing, fr.
Immobilizazio: ing, fr.
Immoderatu: ing, fr.
Immoral: ing, fr.
Immutable: ing, fr.
Inaktibo: ing, fr.
Inalienable ing, fr.
Inapelable ing, fr.





Inbalidatu ing, fr.
Inbalido ing, fr.
Inbariable: ing, fr.
Inbarazio: ing, fr.
Inbentiba: ing, fr.
Inbentibo: ing, fr.
Inbentu: ing, fr.
Inbentzible: ing, fr.
Inbentzio: ing, fr.
Inbiolable: ing, fr.
Inbisible: ing, fr.
Inbisibletasun: ing, fr.
Inbokatu: ing, fr.
Inboluntario: ing, fr.
Inbulnerable: ing, fr.
Indibidualizatu: ing, fr.
Indibiduo: ing, fr.
Indibisible: ing, fr.
Indiferentzia: ing, fr.
Indignante: ing, fr.
Indignazio: ing, fr.
Indikatu: ing, fr.
Indikazio: ing, fr.
Indirekto: ing, fr.
Indirektoki: ing, fr.
Indisziplina: ing, fr.
Indolente: ing, fr.
Indolentzia: ing, fr.
Inebitable: ing, fr.
Inefable: ing, fr.
Inefikaz: ing, fr.
Inefikazia: ing, fr.
Inepto: ing, fr.
Inespresibo: ing, fr.
Inexakto: ing, fr.
Inexistente: ing, fr.
Inexorable: ing, fr.

Infalible: ing, fr.
Infame: ing, fr.
Infamia: ing, fr.
Infantil: ing, fr.
Inferioritate: ing, fr.
Infidel: ing, fr.
Infideltasun: ing, fr.
Inflexible: ing, fr.
Infrakzio: ing, fr.
Ingenio: ing, fr.
Ingenios(o): ing, fr.
Ingenuitate: ing, fr.
Ingenuo: ing, fr,
Ingrato: ing, fr.
Inhumano: ing, fr.
Inizial: ing, fr.
Inkalifikable: fr.
Inkapable: ing, fr.
Inkarnatu: ing, fr.
Inklasifikable: ing, fr.
Inkluditu: ing, fr.
Inkondizional: ing, fr.
Inkonexo: ing, fr,
Inkonparable: ing, fr.
Inkonpatibilitate: ing, fr.
Inkonpatible: fr, fr.
Inkonpleto: ing, fr,
Inkonprensible: ing, fr.
Inkonprentsio: ing, fr.
Inkorporatu: ing, fr.
Inkredulo: ing, fr.
Inkrustatu: ing, fr.
Inkulkatu: ing, fr.
Inkurritu: ing, fr.
Inkurtsio: ing, fr.
Innato: ing, fr.
Innobazio: ing, fr.





Inofentsibo: ing, fr.
Inoportuno: ing, fr.
Inozentzia: ing, fr.
Inpazientzia: ing, fr.
Inpekable: ing, fr.
Inpenetrable: ing, fr.
Inpermeable: ing, fr.
Inpertinentzia: ing, fr.
Inperturbable: ing, fr.
Inpertzeptible: ing, fr.
Inpetuoso: ing, fr.
Inpietate: ing, fr.
Inplakable: ing, fr.
Inplikazio: ing, fr.
Inponderable: ing, fr.
Inponente: ing, fr.
Inportante: ing, fr.
Inposible: ing, fr.
Inpotente: ing, fr.
Inpresio: ing, fr.
Inpresionante: ing, fr.
Inprezisio: ing, fr.
Inpreziso: ing, fr.
Inprobable: ing, fr.
Inproduktibo: ing, fr.
Inpropietate: ing, fr.
Inpropio: ing, fr.
Inprudente: ing, fr.
Inprudentzia: ing, fr.
Inpune: ing, fr.
Inputatu: ing, fr.
Inputazio: ing, fr.
Insensibilitate: ing, fr.
Insensible: ing, fr.
Inseparable: ing, fr.
Insignifikantzia: ing, fr.
Insistente: ing, fr.

Insistentzia: ing, fr.
Insistitu: ing, fr.
Insolentzia: ing, fr.
Insoluble: ing, fr.
Insomnio: ing, fr.
Instigazio: ing, fr.
Instintibo: ing, fr.
Instinto: ing, fr.
Insufizientzia: ing, fr.
Inteligente: ing, fr.
Inteligentzia: ing, fr.
Inteligible: ing, fr.
Intentsifikatu: ing, fr.
Intentsitate: ing, fr.
Intentso: ing, fr.
Intentzio: ing, fr.
Interbalo: ing, fr.
Interbenitu: ing, fr.
Interbentzio: ing, fr.
Interferentzia: ing, fr.
Intermitente: ing, fr.
Intermitentzia: ing, fr.
Internamendu: ing, fr.
Interno: ing, fr.
Interrogatu: ing, fr.
Interzepzio, -tatu: ing, fr.
Intimitate: ing, fr.
Intimo: ing, fr.
Intransigentzia: ing, fr.
Intransitibo: ing, fr.
Intratable: ing, fr.
Intriga: ing, fr.
Intrigante: ing, fr.
Intrigatu: ing, fr.
Introdukzio: ing, fr.
Intrusio: ing, fr.
Intsinuatu: ing, fr.





Intsinuazio: ing, fr.
Intsultatu: ing, fr.
Intzertu: ing, fr.
Intzitazio: ing, fr.
Irreberente: ing, fr.
Irrekusable: ing, fr.
Irrelebante: ing, fr.
Irremediable: ing, fr.
Irrepetible: ing, fr.
Irresistible: ing, fr.
Irresoluble: ing, fr.
Irritakor: ing, fr.
Irrupzio: ing, fr.
Isolatu: ing, fr.

Hemen, gaztelaniaz, ingelesez eta frantsesez bat datozenak bakarrik sartu ditut. Beste hitz asko ere badira tartean, hizkuntza horietako bigaz edo bategaz bakarrik bat datozenak. Esan beharrik ez dago, adibidez, '*inpenetrable*' onartzean, '*penetragaitz*' edo '*penetraezin*' ere onargarriak liratekeela. Eta, batez ere, hitz bat onartzean, normalean, bere familia osoa onartu behar dela. Kasu honetan: *penetratu, penetrazio, penetrakor-penetrante, penetragarri-penetrable, penetragaitz-impenetrable, penetraezin(tasun)-inpenetrabilitate...*

Bokabulario horretan datozen hitzak, A-tik Z-raino, 1.800 bat dira. Zenbaki hori, bakoitzaren familia osoa batezbestetuz gero, 4-z bidertu behar da. Beraz, 7.000tik gora. Hitz horiek guztiak ez darabiltzat, noski, euskal hiztegiekiko intsumisioz edo Euskaltzaindiaganako hisiaz, baizik, euskal hiztun eta idazle bezala, beharrezko sentitzen ditudalako, rakitismo espresiboa gainditzeko. Desio dut (aldarrikatzen ere bai), irizpide ez 'zabalago', baizik 'zuzenagoaren' kariaz, hitz horiek eta beste asko euskal hiztegietan ahalik azkarren sar daitezen, benetako intsumiso eta hisiati aitortzera beharturik aurkitu baino lehen.

## Maileguen irizpidea

Maileguen bai hartze ez hartzeari buruzko irizpiderik laburrena eta zehatzena gorago aipatutako cartesiar 'ideia argi eta bereizien' kontzeptuan aurkitzen dut, definizio berbera hitzetara aplikatuz. Euskarak baduela hitz baten ordain '*argia eta bereizia*'? Orduan ez dago dudarik. Esaterako, *casa* = *etxe*. *Unidad* = *batasun* (adiera batean, behintzat). Hori argi dago. Euskarak ez daukala hitz baten ordain '*argi eta bereizirik*'? Esaterako, '*ambición*'. Orduan, bi aukera daude: edo mailegua hartu, edo neologismo bat sortu. Begira dezagun euskarak zer daukan, eta erreferentziatzat hartu ditugun inguruko hizkuntza nagusiek (espainolak, frantsesak eta ingelesak) zer daukaten. Kasu honetan, hirurak bat datoz: *ambición, ambition, ambition*.

Euskarak zer dauka?

Elhuyar *Hiztegiak: nahi, gura, gurari, desira, lehia (bizi), gogo, asmo, uzi, anbizio; (despectivo) handinahi, goranahi, askonahi, askogura.*

3000 Hiztegiak: *irrits, askogura, handinahikeria, uzi, largura.*

Zehazki Hiztegiak: *nahi bizi, grina, handinahi, goranahi, handinahikeria.*

Emaitza horiek orain-oraintxekoak dira. Begiratu batean, desfile handiegia dakust hemen. Lehenengoak hitz komuna, *anbizio*, hartzen du, desfilearen erdi aldean erdi galdurik bada ere. Bigarrenak eta hirugarrenak ez dute hartzen. Ordain horiek guztiak anbizio hitzaren ordain '*argiak eta bereiziak*' al dira? Ez dut uste inondik ere. Hainbeste ordain '*argi eta bereizi*' ez daiteke izan. Hain zuzen, kontrakoagatik jartzen dira hainbeste sinonimo ilaran.

Orduan, aukera argia da. *Anbizio* hartuko dut eta onartuko dut, zuzen. Gehienez ere, sinonimo hurbil bat edo beste jarriko diot atzetik, ahal bada, ñabardura ezberdinak seinalatuz, baina printzipalaren nagusitasuna lokatu gabe.

Dakusgun orain hiztegi bakoitzak nola erabakitzen dituen 'ambición' hitzaren senideak:





*Ambicionar*

Elhuyar: *Nahi izan, irrikatu, gutiziatu.*
3000 H.: *-ren gutiziaz egon, gutiziatu, irrikatu.*
Zehazki: *Nahi izan, irrikatu.*

*Ambiciosamente*

Elhuyar: *Ez dago horrelako sarrerarik.*
3000 H.: *Gutiziaz.*
Zehazki: *Handinahiz, goranahiz.*

*Ambicioso*

Elhuyar: *Anbizio handiko; askonahi, handinahi, handizale, handinahiko, goranahi; [referido a objetivos, proyectos] asmo handiko, handi.*
3000 H.: *– 1 Handigura, handinahi.*
*– 2 Ambicioso/sa; grande: handi, bikain, eder.*
Zehazki: *– Handinahi, handinahiko, handizale.*
*– (plan etc) handinahi.*

Hauek guztiek erdal-euskal hiztegi baino gehiago dirudite sinonimoen hiztegi bat. Kontzeptu beraren inguruko lau hitzetan bakarrik, 26 senide sartu dira katean: *nahi, gura, gurari, desira, lehia (bizi), gogo, asmo, uzi, anbizio, handinahi, goranahi, askonahi, askogura, irrits, handinahikeria, largura, irrika, gutizia, anbizio handiko, handizale, handinahiko, asmo handiko, handi, handigura, bikain, eder.*

Orain pentsa dezagun euskararen langile batzuek (kazetari, itzultzaile, ikasle, irakasle, idazle...) 'anbición' hitzaren ordain seguru baten bila, hiztegi horietara jo dutela. Hamarretik zazpik baietz hartu izan erabaki diferentea. Eta, beharbada, inork ez du *anbizio* hautatu. Ordain hori hautatu duenak, edo etsita egin du, besteek ez dutelako ase, edo, bestela, hitz komunaren aldeko irizpidea izan balu, ez zukeen hiztegira joko.

Geroago, berriro jo du hiztegietara honako beste zenbait kontzepturen arteko baten ordain bila: *codicia, afán, aspiración, apetencia, deseo, ansia, avidez, anhelo, pretensión, ansiedad, codicia, antojo, apetito, capricho*... Eta berriro aurkitu ditu 'ambición' sarreraren ordaintzat arestian ikusiak zituen gehienak. *Anbizio* hitzarena, salbuespen bat barik, praktika orokorra dela ikus dezanean (milaka hitzen gorabehera da), beharbada, konbentzituko da saiakera honetan zehar errepikatu den ideia batez, hots: hizkuntzaren parte handi eta zentral bat zeharo deskolokaturik dagoela.

Horiek horrela, arrazoiketa sinplea da. 1) 'Anbizio' kontzeptuak euskaraz ez dauka ordain 'argi eta bereizirik'. Bestela, ez litzateke hainbeste sinonimo jarriko. Eta hiztegitik hiztegira ere ez legoke hainbesteko alderik. 2) Sortu diren hitz berriek ez dute kontzeptu hori era 'argi eta bereizian' adierazten. Bestela, hemen ere ez litzateke hainbeste sinonimo, eta hiztegien artean hainbeste alde egongo. 3) Inguruko hizkuntza nagusiek hitz komuntzat darabilte. 4) Zeren zain gaude, orduan?

Ondorioa argi dago: euskararen hitzak dira *anbizio, anbizioa izan/anbizio(na)tu, anbizioz, anbiziotsu/anbizios(o)*. Orain eman, nahi baduzue, sinonimo batzuk, aplikazio ezberdinetan, baina printzipalari azpirik jan gabe.

## *Eredu europarragoa*

Euskaldunik gehienak gaztelaniaren azpian bizi izateak hizkuntza honekiko menpetasun handiegia ekar dezake. Bi aukera daude: bata, gehiengoaren inertziari jarraituz, gaztelania hartzea gidatzat; bestea, eredu europarragora hurbiltzea. Bi aukera horiek, mugaz batetik eta bestetik ez ezik, hegoaldeko idazleen artean ere nabari dira. Batzuek eredu subespainolaren aukera egina dute. Idazle bati baino gehiago entzuna diot aukera honen defentsa esplizitua. Eta oker banengo ere, haien euskaran argi dago eredu horixe praktikatzen dutela.

Beste aukera europarragoa da. Latin hizkuntzetan, bai latinetik, bai senideen antzetik gehien urruntzen dena gaztelania da, hitzen forman, fonetikan, eta lexikoan ere, seguruenik. Italiera, frantsesa, katalana, galegoa, portugesa... oro har, elkarrekin kideago dira gaztelaniarekin baino. Eta zer





esanik ere ez, hizkuntza ez-latinoak, ingelesa, alemana eta abar tartean sartzen baditugu. Euskarari norantz jotzea komeni zaio? Gaztelarantz ala Europarantz? Ez daukat dudarik eredu europarragoaren alde.

Orduan, hitz komunen formak ere ahalik europarrena behar du. Gaztelaniaz *jefe, jeringa, jirafa, jerga, jeroglifiko, jerarquía, deseo* bada, euskaraz *xefe, siringa, girafa, jargoi, hieroglifiko, hierarkia, desira-desio*, frantsesari eta ingelesari jarraituz. Edo gaztelaniako *agudo*, frantseseko *aigu* edo ingeleseko *acute*, euskaraz *akutu*, latin-jatorritik hurbilago. Irizpide hau ahal den arlorik gehienetara zabaltzeak batasunari ere ez lioke on gutxi egingo.

Lexikoan, sarritan, hitz askoren komuntasunak gaztelania eta frantsesa bakarrik hartuko ditu: *volante-volant, freno-frein, desfile-défilé*. Hau ere bada nahiko komuntasun, euskaraz ordain argirik edo hitz berri bat sortzeko modu garbirik ez denean.

Zer egin hizkuntza bakoitzak hitz diferentea dakarrenean, eta euskaraz ordain argirik ez dagoenean? Adibidez: *pantalla-écran-screen, enchufe-prise de courant-plug, huelga-grève-strike, hormigón-béton-concrete, paro-chômage-stanstill*. Orduan, hautatu egin behar. Hautatzeak ez du esan nahi bakarra behar duenik. Bi hitz aukeran utz litezke, hiztegiak bere preferentzia agerturik. Praktikak erabakiko du gero.

Mailegatzen diren hitzak oso maila ezberdinekoak izan daitezke. *Abuztu* hitz komuna da, europarra. *Polea* ere komuna da, frantsesez *poulie* eta ingelesez *pulley* baita. *Bote*, azkenik, gaztelaniazko hutsa da. Beste hizkuntzetan nola diren ez da, berez, euskal hitzen ardura, baina zenbat eta partikularrago izan, hainbat eta kontu gehiago beharko da, hitz bat mailegatzean. *Abuztu*-rekin, okerrenean ere, sub-europarrak gara, *polea*-rekin ere bai, nahiz eta forma sub-espainola kopiatu. Beste batzuekin (*aduana-douane*) sub-espainol/frantsesak, batzuekin (*tronpatu*) sub-frantsesak, eta *bote* bezalakoekin sub-espainol soilak.

## Euskal hitzen lehentasuna

Mailegu hitzei buruz agertu dudan irizpidea ikusirik, norbaitek pentsa lezake euskal hitz askok kanpoan gelditu beharko duela. Ezta inondik ere! Behar ditugun mailegu guztiak hartzeko prest nago, baina etxean daukagun izpirik galdu gabe. Mailegu hitzak hartzeko irizpidetzat *"euskal ordain argirik eta bereizirik ez dagoenean"* esan badut, orain, alderantziz, irizpide bera formulatuko dut: *"Euskal ordain argiak eta bereiziak edozein mailegurekiko lehentasuna dauka"*. Hemen beste irizpide batzuekin talka egin liteke. Euskal hitz batek maileguak baino eremu txikiagoa atzeman dezake, edo literatur tradizioan toki apalagoa edo, agian, hutsa eduki dezake. Kontsidero hauei, garrantzi objektiborik ukatu gabe, arriskutsu eta eztabaigarri deritzet. Arrazoia erudizioaren mende gelditzeko arriskua dago, eta gainera, oso irizpide zehazgabea da.

Euskal hitza euskaratik harako edozein hitz da. Eta euskaratik harako euskal hitza izateko, nahikoa da euskaldunek esaten duten edozein hitz izatea. Definizio ebidentea dela dirudi, baina ez da hain ebidentea, antza, hitz asko eta asko baitaude euskaldun 'guztiek' esaten ez dituztenak. Zenbat euskaldunek dioten hitza izan behar du? Galdera honek azpian tranpa darama, eta uste dut maiz erortzen garela. Niretzat hitz baten euskaltasuna ezin da hiztunen edo une bateko erabiltzaileen kopuruaren arabera neurtu. Euskaldun mordo baten hitza baldin bada (eta euskaldun baten edo batzuen neologismo dudazkoa ez bada), hori euskal hitza da, nahiz lokala edo inguru mugatukoa izan. Irizpide honen lehen abantaila handia, gero esango ditugunez gainera, argia eta zehatza izatea da.

Adibide argi bat jartzeko, urteko hilen zerrendan *abuztu* sartzea erabaki zen, kasu honetan euskal ordain argi bat edukirik: *agorril*. Eztabaida hartan, *abuztu*-ren alde literatur tradizioa, hitzaren hedadura, agian hitz europarra izatea eta abar aipatuko ziren. Zer erru dauka *agorril*-ek, bere hiztunetan idazle gutxi edo gutxiago, edo agian, bat ere egon izan ez delako, edo hiztunak, hizkuntzaren ahultasunagatik, erdal hitzera pasatzen joan direlako? Argi dagoena da *agorril* euskaldun askok esan duela, eta oraindik ere esaten duela. Egia da zenbait euskaldunentzat *'agor'* iraila dela, baina hori etxe barruko kontua da. Dudarik ez dagoena da *'agorril'* euskal hitza dela, eta *abuztu*-ren ordain argia eta zehatza dela. Orduan,





euskal hitzen lehentasun irizpidearen arabera, hitz horrek lehentasuna behar zukeen *abuztu*-rekiko. Erabaki baten ondorioz baztertu zen *agorril* hori, abuztuaren ordain argi, polit, zehatz eta bereizi hori, non esan dezaten itxaron behar dugu? Erroman? Suedian? Etiopian?

*Agorril* hitzaren hedapena nahiko zabala izan da, eta da. Nik, urtean zehar, euskaldun askori entzuten diot hitz hori oraintxe ere. Baina hedapen lokalagoa balu ere, berdin zait. Gaur *'txirrita'* edo *'txirrika'* hitzak ez dakit zer hedapen edukiko duen. Azkuek, bere hiztegian, Bizkaiko zenbait eskualde eta Gipuzkoako Andoain seinalatzen ditu. Plazido Mugikaren hiztegian Nafarroa Garaia ere badator. Ez dakit. Ez dut erudizioan galdu nahi. Dakidana da hitz hori gaur ere familian bertan entzuten dudala. Eta inguruan ere bai, noski, Bizkaiko Lea-Artibai aldean, behintzat. Badakit gero eta gutxiago entzuten dela, baina kasu honetan eta beste milatan, hitzak al dauka hiztunen abandonoaren errua? Kintanaren hiztegian *txirrika* dator, baina bai *polea* ere, *pirrila* eta *motoi* hitzekin batera. Lau sinonimo, tresna bat beraren ordaintzat. Luis Mari Mugikaren hiztegiak *txirrika* dakar. UZEIren *Fisika* hiztegian *polea* eta *txirrika* datoz, ordena horretan. Baina UZEI beraren *Teknologia Mekanikoa/2* hiztegian *polea* bakarrik dator. Hiztegi hau oraintsukoena izanik, hitz hori joango dela aurrera suposatzen da. Eta, nolanahi ere, aipatu hiztegien artean bistan da irizpide garbirik ez dagoela. Azken ELHUYAR HIZTEGIA-k *polea, txirrika* dakar, gero bi aplikazioetan *polea* bakarrik darabilela. Horrek esan nahi du honi damaiola lehentasuna. 3000 HIZTEGIA-k *txirrika, polea* dakar, nahiz eta honek ere, gero aplikazioetan, *polea* bakarrik erabili, gehi sinonimo bat: *Moto* = polea de un ojo. ZEHAZKI HIZTEGIAK, azkenik, *txirrika* bakarrik dakar. Noizbait ere! Arestian formulatu dudan irizpideak balio izatekotan, ez dago dudarik *txirrika* erdal *polea*-ren 'euskal ordain argia eta bereizia' dela.

Beste adibide bat jarriko dut, hau ere bizkaieratik, bide batez, euskalki bakoitzak euskara osora nola aporta dezakeen adierazteko. Bizkaiko Lea-Artibai inguruan, pilotaren erdarazko *'bote'*-ri 'jaiki' (*jagi* ere bai) esaten zaio. *Jaiki txarra egin, jaiki bizia euki, horrek jaukak jaikia*, eta hala. Azkuek Gipuzkoan ere jasotzen du. Hitz horrek ez al du, euskaraz, gaztelaniazko *bote*-k baino eskubide gehiago behar? ELHUYAR HIZTEGIA-k ez du jaso ere egiten 'bote' sarreran, nahiz eta *Euskara-*

*Gaztelania* hiztegian 'jaiki' sarrerari adiera hori jasotzen dion. Hauxe da adibide askotariko bat, non hitz bat, euskal-erdal hiztegian agertu arren, probableenik, galtzera kondenaturik geratuko den, gero erdal-euskal hiztegian ez badator. 3000 HIZTEGIA-k 'bote' sarrerari, adiera horretan, hitz hauek denak ematen dizkio: *jaiki, jagi, salto, pinpa, bote, punpa, ponpe*. Honek, euskal ordaina baino gehiago, desfile bat dirudi, kontzeptu oso zehatz batentzat. ZEHAZKI HIZTEGIAK *bote, punpa, jagi* jasotzen ditu.

Eman litezkeen ehundaka adibidetatik hirurotan *-agorril, txirrika, jaiki-*, argumentua alderantziz formula daiteke. Hitz hauek zein hizkuntzatan esan behar dira, euskaran ez bada? Galdera bueltagabea dirudi. Baina *abuztu, polea, bote* nagusitzen badira, etxekoek kanpora joan behar dute. Kasu honetan, zulora. Kontuak ez dauka zentzurik. Baina ez da hori bakarrik. *Jaiki* hitzak, esaterako, badauka sinonimo bat Iparraldean: *punpa*. Bi hitzon artean hautatzea edo aukeran uztea plantea daiteke, baina biak zapuztu eta gaztelaniazkoak nagusitu behar al du, geuk '*euskal ordain argiak*' edukirik? Are zentzu gutxiago oraindik.

Toribio Etxebarria eibartarrak badu liburu bat, Euskaltzaindiak 1986an argitaratua, izenburu honegaz: *Flexiones verbales y lexicon del euskera dialectal de Eibar*. Urteak dira, liburu horri begiratu bat eman niona, eta bertan dakarren hiztegi luzetik berrehun bat hitzeko hautua egin nuena. Hona hemen bera:

*Aketua, alekia, amain emon, anporra, anporlarixa, apua, arol, arraria, arriabarra, arrio egin, arriolari, arroka-arronikia, aujiak, axaixa emon, baibai jendia, bairatu, baittu, balio, banderia, basako, bastiki, begi aliak, begitxuan, bili, bili-bili, bilikumia, biñatu, biraldatu, biregatxa, birigatxa, birolia, bitokixa, bizkargi, blastiau, blastiua, briz-briz, briztada, brizt eiñ, burugin, damaskinua, duangua, emakia, enorra, epetakuak, eroso, erpillak, erreuso, ertz-illa, eruana, eskolarixa, eskua-artu, eskua emon, eta bi, etzindu, ezlakua, ezmena, eztibitsa, fafua, fota, furixadia, furruztau, galopan, gantxilla, garbatu, gauzaduna, gert, geruna, gezala- kresala, girapua, girgiluak, gizatua, gizaundixa, gizonkia, gogotasuna, gogotixa, gogotu, gorbixa, gorbiztu, goruntza, guena, gureza, guzurteixa, guzur anporra, guzurti anporlarixa, ibai-erria, ingirau, iñundo, iragotu, irraria, irulein, islia, ituna, ituntasuna, itzalpena, ixua, jaikitasun, jarki, jasotasun,*





*jaunkixa, kakaumia, kakua, kakularixa, kanpo-larrosia, karakotia, karutixa, kaskilla, kerrua, kopiña, kopinkerixia, koskara, kostia kosta, kulape emon, kunbua, labankizuna, lapiatu, lagunkixa, lakañia, lauskittu, litxia, luraldatu, mazpildu, minberia, moskorona, nai-eza, narrua, nastabarra, nekatsua, neke ta abar, neuzalia, oindu, on be, opatsua, padarra, pasaixa, pasagarrixa, pasma, pegoria, perkatxa, pikar, pirau, pitxadia, pitxirrixa, ponpolotia, puruan, sabeloixa, saiña-zaiña, saitxu, sapua, sarroi, siku, sinbrixua, sirrindaria-zirrindaria, sur karakotia, takarra, talaixan ibili, tati, tiñotu, txaplata, txatxaria, txikua, txilibrizkau, txingeta, txirrika, txutxua, ukat eiñ, umekia, urbatua, urkuldu, usaindu, zanbruak, zelbia-xelbia, zer dala barik, zeterixa, ziburua, zinbrixua, zirauna, ziz da biz, zostu, zurkatxa, zurrukutuna, zutiña, zutiñik.*

Toribio Etxebarriak hiztegia artikulu eta guzti eman zuen, Eibarren nola esaten eta ahozkatzen den adierazteko, eta horrelaxe utzi ditut. Hitz hauek hautatu nituen: edo euren esanahiagatik (asko teknologikoak, Eibarren hain eurena duten tradizioari dagokionez), edo euren adiera interesgarriagatik, edo euren argot-izaeragatik. Orduan, oraingo hiztegiak agertzeko zeuden, baina ziur naiz gehienak ez dituzuela inon aurkituko, hitzok hemen daukaten adieran, behintzat. Zerrenda hori egin banuen, izan zen uste nuelako euskara nazionalera pasatzea merezi zutela. Aldarrikatzen ari naizen irizpidearen arabera (euskal hitzen lehentasuna), dudarik gabe merezi ere.

Azken urteetan, honelako lanak, herri-hizkera jasotzen dutenak, han-hemen, edonon egin izan dira. Esango nuke ia Euskal Herriko zoko guztietako euskarak jasota daudela. Gehienbat, nik ezagutzen dudanetik, behintzat, udalek ordaindutako ekimenetan. Orain bizi naizen Durangaldean, badira neuk dakizkidan herri batzuk, bertan honelako azterketa potoloak egin direnak. Denetan ez bada ere, herri batzuetan egindako azterketok eskualde osoa nahiko ondo ordezkatzen dutela esan liteke, ia azpi-euskalki berbera edo oso hurbila izaten delako. Toribio Etxebarria bezala, pertsona partikularrak ere ez dira gutxi, antzeko lanak egin dituztenak.

Orain, galdera bat. Zertarako dira hainbeste lan eta diru kostatako jasotze guztiak, gero euren zokoetatik ez inoratzekotan? Euskararen bitxitasun etnografikoen ganbaran gelditzekotan? Material horrek guztiak,

denon hizkuntza den euskara batua aberasteko balio ez badu, ez nau askorik xarmatzen. Zerrendaturiko hitzak, denbora laburrean, jasoak izan diren lurrean ere ahaztuak izango dira. Fatalitate hori inpotentziaren edo inkontzientziaren seinaletzat jo behar da. Sinonimoak biak, kasu askotan, inkontzientzia bera baita inpotentzia. Alderantziz, `ostera, denontzat interesgarriak, 'argiak eta bereiziak', izan litezkeen hitzak, adierak eta argota, euskara batura pasatzeko bezain kultura-maila efikaza bagenu, beste kolore, espresibitate eta osotasun bat luke gure hizkuntzak.

Euskal hitzen lehentasun irizpideak hiru abantaila handi dauzka:

1) Irizpide argia eta zehatza. Existentzia frogatuz gero, beste arrazoiak, –literarioak eta abar– sobera daude. Alderdi hau nahiko azaldua gelditu da.

2) Euskalkien ondare posible guztia integratzeko modua. *Agorril, txirrika, jaiki* eta antzeko beste hainbat eta hainbat hitz esaten dituztenak euren hitzak euskara osora zabaldurik ikustean, seguruago eta euskaldunago sentituko dira. Eta euskara batua sinesgarriago eta maitagarriago egingo zaie. Alderantziz esanda, euskara batua bera ere euskaldunago eta aberatsago izango da. Nolakoa izan behar du, ba?

3) Berreskuratzea. Kontzeptu honi, teorikoki, garrantzi handia ematen zaio. Normaldu nahian dabilen hizkuntza batek erosio eta galera handiak jasan dituela esan beharrik ez dago. Bestela, aspaldi normaldurik zegokeen. Normaltzeak, beste hainbat gauzaren artean, jasandako hutsuneak ahalik gehien birbetetzea esan nahi du. Edo behar luke. Baina printzipio honen garrantzi teorikoak ez du ezertarako balio, praktika kontsekuenteak ez badarraio. Hitz bat zenbat eta aztertuago eta ahaztuago izan den, hainbat eta gogo gehiagoz birplazaratu behar genuke. Alde horretatik, galduta dagoen erronkarierako zenbait hitz gustura hartuko nituzke, nahiz eta orain inork inon ez esan, baldin kontzeptu, adiera edo ñabardura propioren bat adierazten badute. Eta hori baikorki eta muzinik gabe, berreskuratzen ari izatearen pozez eta segurantzaz.

Sarritan, euskararen barne ahalbideak garatze kontuan, hizkuntza hila balitz legez jokatzen dugula ematen du. Hobetzeko kasuan, arkaismoa,





lokalismoa, artifizialtasuna eta abar aipatzen dira. Degradazioak dakartzan arrozkeriak (nik dakidala, gaztelania ere hizkuntza arrotza edo 'erdara' da euskararentzat) eta gainerako zaborrak, ordea, eboluzio, gaurkotasun eta gisako eufemismoekin justifikatzen ditugu. Baina hizkuntza hau, ahulki bada ere, bizirik dago, eta euskalkietan eta euskararen zoko guztietan bizirik dirauen guztia euskara batuak bereganatzea ez da fosilak pizten saiatzea.

## *Bereizkuntzen lehentasuna*

Mailegu eta barneko, euskal hitz guztiei toki emateak ez luke balio optimorik, bereizkuntza posible guztiak probexteko ez bada. Hitz batek, denik lokalena edo minoritarioena bada ere, esanahi argi eta ezberdin baten bereizkuntza markatzen badu, euskara osora zabaltzea merezi behar luke, beste arrazoi guztien gainetik. Hortik datorke benetako aberastasuna, batez ere, euskara bezalako hizkuntza oraindik ez normalduetan. Eta hortik segurtatzen da euskalkien ekarpen posible guztia, eta euskara batuaren sinespide muzingaitza. Adibide batzuk emango ditut, hizkuntza osoaren barruan izan litezkeen ehunkaren (beharbada, milakaren) adierazle. Sintaxiari dagozkion bereizkuntza batzuk ere aipatuko ditut, interes berdintsua baitute.

ESANEZ-ESANDA: Hain bereizkuntza garrantzitsua eman dezaketen bi formok gero eta gehiago erabili ohi dira sinonimotzat. Horrela ez dugu ezer irabazten. Euskaldun askoren buruan, *esanez, eginez, janez*... formek ari den egintza adierazten dute, amaitu gabea, abian dena. *Esanda, eginda, janda*... ordea (berdin *esanik, eginik, janik*...), egintza amaituak dira. Gauza bat da *janez nator, nahi duena esanez joan da,* eta beste bat *janda nator, nahi duena esanda joan da*. Lehenengoan jan eta etorri, esan eta joan, batera gertatzen dira. Natorrela ari naiz jaten, bidean janez nator. Bigarrenean, lehenbizi bata eta gero bestea gertatzen dira. Janda nator, hots, lehenbizi jan egin dut, eta gero hasi naiz etortzen. Ez dago inolako motiborik, hain esanahi ezberdinak eta bereizkuntza interesgarriak galtzeko. Zenbait kasutan, muga ez da hain zehatza izango, eta inoiz berdintsua ere bai, baina gehienetan, aldea argi egon ohi da.

EGITEAN-EGITERAKOAN: Hauek ere sinonimotzat jotzeko ohitura sartu da, forma luzeak laburra ia sistematikoki baztertuz. Ez dut esango gaizki dagoenik, baina, euskaldun askorentzat, hemen ere bada bereiztasun bat. Izenekin, RAKOAN atzizki bikoitzak unea bera, aurrekoa edo ondokoa adieraz ditzake, edo hobeto esanda, uneaurrea, unea bera eta uneondoa garbi bereizten ez diren une globala. Zer da, adibidez, '*etxerakoan*'? Forma honek argi dago, elipsi bidez, aditz bat edo zerbait ezabatu duela. Etxera heltzean edo heltzen ari zarela? Etxera heldutakoan edo heldu ondoren? Ala etxera bidean edo etxeranzkoan? Gehienean, lehenengo bietako bat dela dirudi, baina hirugarrena ere izan daiteke. Esaterako, taberna batean sartzen zara eta diotsute: *Aizu, hemen pakete hau utzi dute zuretzat. Tori.* Eta zuk erantzuten duzu: *Eduki bertan, mesedez. Orain mandatu batzuk egitera noa. Etxerakoan hartuko dut, ardura ez badizu.* Hemen argi dago *etxera noanean* edo *etxeranzkoan* esan nahi duela. Edo norbaitek dio: *Oherakoan baso bete esne hartu behar izaten dut beti.* Hemen ere argi dago lehenbizi esnea edaten duela, eta gero oheratzen. Beraz, RAKOAN atzizki bikoitz honek, izenekin, aldi orokor luze samarra adieraz dezake, aldi horren zein une zehatz kontestuak bereizten duela. Berdin besteetan: *eskolarakoan, lanerakoan, mendirakoan, elizarakoan, itsasorakoan...*

Aditzekin, ostera, bereizkuntza interesgarri bat dago bien artean. '*Jasotzean*' jasotzen ari zarela da. *Harritzar hori jasotzean zer pentsatzen duzu?* Hemen, harria jasotzea eta pentsatzea aldiberekoak dira. *Harritzar hori jasotzerakoan, zer pentsatzen duzu?* Hemen, jaso aurreko une hurbila, jasotzera zoazenean litzateke. *Harria jasotzerakoan, gehienek aitaren egiten dute.* Zaila da, izan ere, egintza biak (harria jaso eta aitaren egin) batera gertatzea. Bistan da harriari heldu aurreko unea dela. Ezinezkoa litzateke *harria jasotzean aitaren egitea,* hots, harria jasotzen ari dela. Egintza baten uneak honela sailka daitezke, aditz-atzizkien arabera: *hiltzerako, hiltzerakoan, hiltzear, hiltzean, hilez, hilda-hilik, hildakoan. Esan* aditzarekin: *esaterako, esaterakoan, esatear, esatean, esanez, esanda-esanik, esandakoan.* Ñabardura hauek denak bereizi ahal izanik, sinonimo soiletara biltzea pobrekuntza tamalgarria litzateke. Eta sinonimoak direla jo behar bada ere, nahiago dut, gehienean, *esatean* forma *esaterakoan* baino, hau ahoa bete behar denerako utzirik.

BIRIBIL-BOROBIL: Bi adjektibo hauek hitz beraren aldaeratzat eta,





gehienbat, sinonimo hertsitzat jo ohi dira. Alde bakarra, batzuek 'biribil' diotena beste batzuek 'borobil' diotela. Edo bata zein bestea, baina bereizi gabe. Zer zabaleratakoa den ez dakidan inguru batean, ostera, esanahi ezberdinez darabiltzate, oraindik ere, biak. 'Biribila' zirkunferentzia da, esaterako, erlojuaren esfera. 'Borobila', ostera, bola, esaterako, pilota, lurra... Bereizkuntza interesgarria ez al da?

ERAKUTSI-IRAKATSI: Gauza jakina da euskaldun askorentzat 'erakutsi' berdin dela 'ikustarazi' zein 'ikastarazi'. Biak erabiltzen dituen gutxiengo batentzat, ostera, 'erakutsi' ikusaraztea edo seinalatzea da, eta 'irakatsi', ikasgaia azaltzea. Bataren egintza begientzat da, bestearena, adimenarentzat.

ZUR-EGUR: Bereizkuntza egiten zutenen artean ere, geroz nagusitzenago doa 'egurra', hain polita den 'zur' hitzaren bazterkuntzarako. Politetik aparte, biak erabiltzen dituztenen (edo erabili izan dituztenen) buruan, bereizkuntza argia dago. Zura material orokorra da, gaztelaniazko 'madera'. Egurra, berriz, zur mota bat, gaztelaniazko 'leña'. Oraindik ere, 'zurezko etxea' dioten euskaldun askorentzat, 'egurrezko etxea' entzutea gaztelaniazko 'casa de leña' bezalakoa litzateke. Izan kontu, gainera, 'zur' ez dela lokalismo txiki bat, Euskal Herri osoko hitza baizik.

EBAKI-MOZTU: Euskaldun askoren buruan, batzuek bata, beste batzuek bestea erabiltzetik aparte, biak sinonimo hertsiak dira. Toki bat baino gehiagotan, ostera, bereiztu egiten dituzte. 'Ebaki' da zerbait luzetara zulatzea, urratzea, baina erdibitu edo zatirik kendu gabe. Esaterako, aiztoarekin, besoan edo aurpegian egiten den zauria, ebakia. 'Moztu', ostera, etetea edo zati ezberdinak egitea litzateke, askotan, hondo-hondotik. Esaterako, belarra, burua...

KANTU-KANTA: 1960an, Euskaltzaindiak liburuxka bat argitaratu zuen, *Euskal-Kantak* izenburuz. Euskaldun asko dira *kanta* eta *kantu* bereizten dutenak. *Kantu* kantatzearen ekintza da (gaztelaniazko 'canto'), eta *kanta,* doinu jakin bat (gaztelaniazko 'canción'). Komunikabideetan, ia galdua da bereizkuntza. Zer irabazteko?

HARGAGI-OKELA: Nahiz eta euskaldun askok lehenengo hitza

bakarrik ezagutu, beste askorentzat, 'haragia' gizakien eta animalien mami bizia da. 'Okela', ostera, jaten den haragia, hilda dagoena. Lizunkeria edo bizio karnala haragiarena litzateke, 'haragikeria'. 'Okelakeria', ezer izatekotan, sabelkeria edo okela gehiegi jateko bizioa litzateke.

GIZON-GIZAKI: Hauek ez dira inondik ere sinonimoak. 'Gizon' edo 'gizonezko' sexu arreko pertsona da. 'Gizaki', berriz, gizon zein emakumeen multzoko edonor. Gaztelaniazko 'el hombre de hoy' ez da 'gaurko gizona', 'gaurko gizakia' baizik. Generoari buruz, zorionez gertatzen adi den aurrerakuntzaren barruan, ez dakit oraindik nola deskuida gaitezkeen adiera horretan, 'gizon' esaten eta idazten. Idazten, batez ere, esaten deskuidatzea ulergarriago baita, erdaren eraginez.

Hauetan eta beste antzeko milatan, kontua ez da euskaldun batzuek edo gehienek zerbait 'gaizki' esaten dutela (eztabaida antzua eta faltsua), baizik batzuek darabiltena, nahiz eta agian gutxiago izan, bereizkuntza aberasgarria den ala ez. Neuk ez daukat dudarik bereizkuntzak aberasgarri direla. Hiztegi batu batek (bestela, bereizkuntza galkorrak dira), inor gaitzetsi edo gutxietsi gabe, hobespenak markatu behar lituzkeela uste dut. Eta, batez ere, uste dut (ameskeria bat?) hizkuntza ahalik osoenaren alde gaudenok hobespen horiek asimilatzeko prestasun gogotsua behar genukeela.

## *Ona eta hobea*

INDARGARRIAK: Indargarriek hizkuntzari bizitasun eta kolore handia damaiote, eta euskalki guztien bereizkuntza komuna izan da, eta da.

a) Izenordain pertsonalak eta erakusleak: *ni-neu, ni-nihaur, ni-neroni, zuk-zeuk, zuk-zerorrek, zuk-zuhaurrek, ha-haxe-bera, hura-huraxe-bera.* Eta horrela, deklinabideko beste kasu guztietan.

b) Posesiboak: *ni-neure, ni-neronen, ni-nihaurren; zure-zeure, zure-zuhaurren, zure-zerorren; haren-harexen-bere.* Hemen ere, deklinabideko kasu guztietan.





c) Adberbioen indargarriak: *hemen-hementxe, han-hantxe, orduan-orduantxe, horrela-horrelaxe, orain-oraintxe...* Beti indargarria, galdegai direnean: *Oraintxe nator. Hantxe ikusi zintudan. Jainkoa bezalaxe bizi naiz.* Hauetan ere, araua ez da denean berdin zorrotza izan.

Aplikazioa ez da zaila, arau bikoitz honekin:

1) Beti indargarria, izenordain edo posesiboaren eta aditzaren subjektua bat bera direnean. *Zuk zeuregan-zerorrengan-zuhaurretan bakarrik pentsatzen duzu. Nik neurea egin behar dut. Zuhaurren burutik mintzo zara. Egin ezak herorrena.*

2) Beti indargarria, posesiboa edo posesibodun hitza galdegaia denean: *Zeure ardura da hori. Gaur zerorren etxean lo egin nahi nuke. Nihaurren bizkarretik bizi zara.*

Azken kasu hau eta adberbioena ez da euskalki guztietan berdin zorrotz gertatu, eta ezeinetan ere ez zorrotzegi.

"Euskalki guztien bereizkuntza komuna" esan dut, harik eta idazleak eta esatariak tropelean agertu diren arte, bereizkuntzak sistematikoki eliminatuz, edo oker edo aldizka aplikatuz, zerbait badelako kanpaiak entzunik. Horrela, normala da irakurtzea edo entzutea: *Nik nirea egingo dut, zuk zurea egiten duzun moduan.* Forma horiek belarrian tiro bat bezala dira, 'nik neurea', 'nik neronena' edo 'nik nihaurrena' esaten ohituak direnentzat. Badakit araua ez dela kasu eta kontestu guztietan hertsiki aplikatzekoa. Adberbioetan, batez ere, aplikazio sistematikoa astunegi, ia arlote gerta daiteke. Badakit, baita, era neutroa ez dagoela, nahitaez, txartzat jo beharrik. Hemen, zorrotzean, 'txarto' ez dago ezer, baina hobeto dagoenari jarraitzeko, ez genuke muzinik izan behar. Dudatu ezin dena da hain etengabe agertzen den baliabide honen erabilera zuzen eta oportunoa elegantzia eta kolore literario baten adierazgarri dela.

HAMABIAK HAMAR GUTXI: Hitzak eta esamoldeak ahalik gehien laburtzearen aldekoa banaiz ere, ez dut ikusten '*gutxiago*'-ren laburdura besterik ez den '*gutxi*' horrela normaltzeko arrazoirik. Laburdura honela dator: *gutxiago-gutxigo-gutxio-gutxi.* Berdin *gutxiagotan-gutxigotan-gutxiotan-gutxitan.*

Eboluzio hori, agian, onartuko nuke, emaitzak bi kontzeptu oso ezberdin, *gutxi* eta *gutxiago*, nahasiko ez balitu. Eta, gainera, eboluzio hori euskaldun batzuengan bakarrik iritsi da horraino. Beraz, Euskadi Irratia, Euskal Telebista edo egunkari nazionalak bezala, Euskal Herri osorako mintzo garenean, ez dago dudarik *hamabiak hamar gutxiago, hamarrak laurden gutxiagotan,* eta abar behar lukeela. Laburdura hori egiten duen euskalkietan ere, ez dut ikusten *gutxi* eta *gutxiago* nahasita ezer irabazten denik.

Baliteke laburdurazko kontua ez izatea ere. Hots, demagun euskaldun askok halaxe finkatu dutela betidanik aplikazioa. Kasu horretan, ordea, berdin da egia beste euskaldun askok konparatiboan finkatu dutela, logikak, inguruko hizkuntzak lekuko, agintzen duen bezala. Ez dut euskaldun batzuen *laurak hamar gutxi* gaitzesten, beste euskaldun askoren *laurak hamar gutxiago* hobesten baizik. Bi soluzio daudenean, hobeari jarraitzea izan behar luke lege orokor. Kasu honetan, ez dago dudarik konparatiboa hobea dela.

ZER HABIL: Euskalki batzuetan, *zer ari haiz, zer habil* eta horrelakoen kastellanismoa (*qué andas*) hizkeran maiz entzuten bada ere, argi dago *zertan ari, zertan ibili* dela, *lanean, dantzan, musean, berriketan*... bezala. Euskal Herri osoari mintzo zaionak koherentzia hori errespetatu behar luke, berriz ere, soluzio hobearen alde.

ZERTAN, ZERTARA: Bizkaieraren eremu handi batean, 'zertan habil' ondo bereizten dugunok, gero, 'zertan hoa' ere berdin esaten dugu, noranzko aditz bati aditzak darraionean. 'Etxera noa, musikara noa', baina 'bazkaltzen noa, musika jotzen noa' = bazkaltzera noa, musika jotzera noa. Horrela, 'musika jotzen noa' gauza bi izan liteke: 'musika jotzen edo jotzen noa' (hori ondo legoke) eta 'musika jotzera noa'. Nahiz eta etxeko hizkera etxean aldatzen hastea bortxatua izan daitekeen, argi dago aditzetan ere noranzkoa markatzen duen aukera hobesgarri dela. Nahiz eta neure etxean eta inguruan 'bazkaltzen noa' esan, inoiz ez dut horrela idatziko, ez medio orokor batean esango. Eta ez arau baten betetzez, kalitate hobearen atsegin osoz baizik.

HISTORIA HONEKIN AMAITU: Kastellanismo hau (ingelesetik hartua, seguruenik) premia gabe normaltzen ari da: *Historia honekin*





*amaitu behar da, nire pazientziarekin bukatu behar duzu, astakeria hauekin amaitzeko*... Euskaraz konplementu soil bat besterik ez da hori: *Historia hau amaitu behar da, pazientzia bukatu behar didazu, astakeria hauek amaitzeko*... Norbaitek esan lezake (erdararen eraginez, beti ere) *nire pazientzia bukatu* eta *nire pazientziarekin bukatu* ñabardura ezberdinekoak direla. Hala balitz ere, euskarak badauka horretarako adina modu, aditza aldatuz. *Nire pazientzia akabatu behar duzu,* edo beste zenbait esamoldez: *astakeria hauena amaitzeko,* eta abar.

Badira beste esaera batzuk, non gaztelaniazko 'terminar con' delakoak 'romper con' edo harremana haustea esan nahi duen: *he terminado contigo = he roto contigo*. Euskarak ez dauka inola ere esamolde literal horren premiarik. *Zurekikoa egin dut, zugazkoa egin dot, zurea amaitu dut,* eta abar aspaldi asmatuak ditugu horretarako.

FAMILIAKIDEAK: Har ditzagun familiakideen izenak. Bizkaierak badu beste euskalkietan ez dagoen '*neba*' hitza. Hauei hiruko koadroa gelditzen zaie: *anaia-arreba-ahizpa*. Argi dago hirukoan bat falta dela, arrebaren simetrikoa. Mutilarentzat neska *arreba* bada, neskarentzat mutilak ez luke *anaia* izan behar. Hizkuntzak kapritxosoak direnez, izan liteke horrela, eta ez da ezer gertatzen, baina euskaldun mordo handi batek badauka laukotea osatzeko hitza, eta hala izanik, horrek euskara osora pasatu behar duela ez dago dudarik, koadroa honela gelditzen delarik:

Mutil → mutil = *Anaia*
Mutil → neska = *Arreba*
Neska → neska = *Ahizpa*
Neska → mutil = *Neba*.

Argi dago laukoa hirukoa baino hobea dela.

Euskaldun gehienek erdarazko *nieto/nieta, petit-fils/petit-fille* eta *sobrino/ sobrina, neveu/nièce* ez dituzte bereizten. Baliteke, jatorriz, bata *loba* eta bestea *bir-loba* izatea, baina joan den aspaldian, *loba* dioenak bietarako darabil, eta gainera, neska nahiz mutilentzat. Berdin *birloba, biloba, iloba* eta aldaera guztiak diozenak ere.

Zenbait euskaldunek, ordea, *nieto-nieta* adierazteko, *semeso-alabaso* edo *semetxi-alabatxi* darabilte. Baditut azken forma hau oraintxe ere darabilten lagun handiak. Hauek *aitatxi-amatxi* esango dute, besteek *aitita-amama*, *aitona-amona, aitajaun-amandre, aitaxe-amaxe, aitaso-amaso, aitañi-amañi*, *apitxi-amitxi* diotena adierazteko. Jesus! Hau da izen pila, gauza bera adierazteko!

Batzuentzat, *aitabitxi-amabitxi* erdarazko *padrino/madrina*, *parrain-marraine* dira, nahiz eta erdarazko *ahijado-ahijada, filleul-filleule* gero *besoetako* izan. Baina badira euskaldunak, laukotea *aitabitxi/amabitxi-semebitxi/alabitxi* osatzen dutenak, gero, agian, beste nonbait hutsunea agertuko badute ere.

*Gusu* hitzean ere bada konbinapen ugari. Gehienentzat, *gusu* hitza ez da existitzen, konposatuetan izan ezik: *lehengusu, birgusu,* eta abar. Baina hitz hori badago, bere femenino *gusina* bezala, eta hemendik dator mailatze oso eta ezin garbiago bat: *lehengusu-lehengusina, birgusu-birgusina, herengusu- herengusina, laurdengusu- laurdengusina,* eta abar, izen orokorra *gusu-gusina* litzatekeela.

Hitz batez, oihan honetan, zuhaitz guztiei falta zaie zerbait, edo, positiboki esanik, zuhaitz guztiek daukate besteek ez daukaten zerbait. Zergatik ez denekin zuhaitz ahalik osoen bat hornitu? Hona oraintxe inprobisatuko dudan bat:

*arbasoak-gurasoak-semealabasoak*

| | | |
|---|---|---|
| Laurdenamama | Laurdenaitita | |
| Herenamama | Herenaitita | |
| Birramama | Birraitita | |
| Amama | Aitita | |
| ...birrizeba-izeba-Ama | Aita-osaba-birrosaba... | |
| Arreba-ahizpa-Alaba | Seme-anaia-neba | |
| Alabaso | Semeso | (I)loba |
| Birralabaso | Birsemeso | Birloba |
| Herenalabaso | Herensemeso | Herenloba... |





| | |
|---|---|
| Laurdenalabaso | Laurdensemeso |
| | |
| Amaginarreba | Aitaginarreba |
| Errain | Suhin |
| Errain-ahizpa | Suhin-anaia |
| Errain-neba | Suhin-arreba |
| Koinata | Koinatu |

*gusu-gusinak*

| | |
|---|---|
| Lehengusu | Lehengusina |
| Birgusu | Birgusina |
| Herengusu | Herengusina |
| Laurdengusu | Laurdengusina... |

*aitabitxi-amabitxiak*

| | |
|---|---|
| Amabitxi | Aitabitxi |
| Alabitxi | Semebitxi |

Hauek guztiak *ahaideak* lirateke, eta arreba-ahizpa-anaia-neba, *senideak*. Badakit zuhaitz osoagoa eta hobea egin daitekeela. Hau ez da adibide bat besterik. Demagun dauzkagun elementuekin onena osatu dugula. Ba, horixe da aniztasun ia exotiko horrek eman lezakeen emaitzarik ederrena. Horixe da euskaldun guztiok onartzeko irrikatzen egon behar genukeena. Orduantxe litzateke euskara batua euskalki guztien aberastasunen batuketa. Nor uka daiteke horixe nahi izatera?

Osotasun horren truke, pozik utziko nuke, adibidez, bizkaieraz *senide* hitzak daukan *ahaide* esanahia. Eta, bai bitxia, hitz horren osagai nagusia, *sein* (haurra esan nahi du), Bizkaiko inguru batean bakarrik gordetzen da bizirik, nahiz eta gero, han ere, *senide*-k 'ahaide' zentzua eduki. *Senide* zentzu zuzenean darabilen askok, berriz, *pariente* esango dizu gero, ez baitu *ahaide* ezagutzen. *Haurride* ere hor dago *senide*-ren sinonimo. Baliteke hauei bereizkuntzaren bat erantsi ahal izatea. Diodan osotasuna seguru delarik, ez zait hainbeste ardura hitz batzuen zein forma hartu,

*aitita-amamak, aiton-amonak* ala beste zerbait. Zuhaitza ardura zait, eta ahalik koherentziarik handiena. Ez naiz hasiko, banaketa ustez justuren baten izenean, *aitona-amama, aitaponteko-amabitxi* eta horrela nahasten.

Horrek ez du esan nahi bakoitzak bere inguruan bere hitzak arbuiatu behar dituenik. Etxea, eskualdea, euskalkia eta Euskal Herria oso geruza ezberdinak dira. Ni Euskal Herrirako edo Euskara Baturako ari naiz. Eta maila horretan ari garenean, bakoitzak prest egon behar du, bere zuhaitz mugatuaren ordez, zuhaitzik osoena onartzeko. Buruz prest ez ezik, bihotzez desiatzen. Gertatzen dena da, sarritan, geure zuhaitzeko tximinoak garela, eta horren itzaletik ez urruntzeko aitzaki-arrazoiak laster aurkitzen ditugula: artifizial, lokalismo, gehiengo... Euskaldun guztiok ere zenbat gara, ba? Neure euskalkiaren aportazio posibleak euskara batuan ikusteko bezain irrikaz nago beste euskalki eta euskal zoko guztietakoak bertan ikusteko eta ikasteko. Baina denok ikastekotan, ez erudizio, bitxitasun edo denborapasa gisan. Euskalkiek daukaten guztia bilduko duen eta falta duten guztia hornituko duen Euskara Batua behar dugu, eta, horretarako, tresna ez bakarra, baina bai oinarrizkoa (garrantzitsuena, esango nuke) *Euskal Hiztegi Osoa eta Nazionala* da.

BATZU, BATZUAK: Euskaltzaindiak onartuak dira: *Bat, bata, batek, batak. Batzuk, batzuek.* Eta dagokien deklinabide guztia. Baztertuak: *Batzu, batzuak.* Forma hauen tradizio argumentuez aparte, eta *batzu-batzuk* sinonimo hertsitzat jorik, bistan dago multzo hobea osatzen dela honela: *Bat, bata, batek, batak / batzuk, batzuak, batzuek.* Lau singularrean, hiru pluralean, paralelismo garbian eta guztiz logikoan, *batzuek,* pluralean, kointzidentea izatetik aparte. *Bat* zenbakiaren deklinabide bikoitzari ere (*batean-batetan, bateko-batetako...*) eutsi egingo nioke, irizpide beraren arabera. Euskaran, hala egin ahal izateko oinarria egonik, zergatik galdu behar dugu bereizkuntza bat?

HAUK, HORIK, HAIK: Onartuak: *hau-hauek, hori-horiek, hura-haiek.* Baztertuak: *hauk, horik, haik.* Berriz ere, tradizio argumentuetatik aparte, bikoteari baino hirukoteari hobea deritzot: *hau-hauk-hauek, hori-horik-horiek, hura-haik-haiek.*

Kasu bakoitzean gehiengoaren argumentura makurtzen bagara,





denen aberastasun partikularrak lurpera doaz erremedio gabe, euskararen aberastasun posible asko eta asko, hain zuzen, eremu minoritarioetan aurkitzen edo gordetzen baitira. Oinarria dagoen tokian, lehentasuna kalitateari zor zaio, horrelaxe bakarrik salba baitaiteke gehiengoaren ondarea. Gutxienen aberastasun txikiak baturik, denen aberastasun handia lortuko da. Euskara normalduaz gainera, ez al goaz euskararik aberatsenaren bila?

LUZE-LABURRAK: Inguruko hizkuntza nagusien aldean, euskara, gehienetan, luze gertatzen da. Erantzule nagusiak bi dira: aditzaren joko perifrastikoa eta hitzen luzera bera. Aditzean, sarritan, bera ere bikoitza izanik, aditz-jokoan hiru osagai agertzen dira: *gorroto izango nuke, ez lirateke batera etorriko, kalte egingo zenuke.* Hitzetan, berriz, bakunak erlatiboki gutxiago izanik (silaba-bakarrak, oso gutxi), asko eta asko hitz-elkarketatik sortuak dira: *itxuraldaketa, zaharberritu.* Edo atzizkien pilaketatik: *elgarretaratze, elkarkidetasun, bideragarritasun, arduragabekeria.* Euskarak baditu, noski, abantailak ere, baina horiek ez dira konpontzeko, erabiltzeko baizik. Hain zuzen, luzatzeko baliabidez ondo horniturik gauden moduan, sarritan laburtzekoak falta izaten dira, batez ere, dauzkagunak galtzeko joera dagoenean.

Izan ere, makalduz doan hizkuntz senak elementu gehiago eta esplizituagoak behar ditu ondo ulertzeko. *Esatean, ikustean, konparatzean* ondo harrapatzen ez dituenak *esaterakoan, ikusterakoan, konparatzerakoan* entzun behar du. *Neuk ikusitakoa da, lehen esandakoak errepikatu, zeuri ikasitakoa da, noiznahi entzuten duguna da* esan beharko du, ez delako seguru aurkitzen beste forma hauekin: *neuk ikusia da, lehen esanak errepikatu, zeuri ikasia da, noiznahi entzuna dugu.* Partizipio burutuaren forma ere bikoitza, guztiz esplizitua beharko du: *eskertzen dut zu etorri izana; gero penagarri gerta daiteke gauza bakoitza bere sasoian ez burutu izana; gehiegi hitz egin izanaz beste kezkarik ez daukat.* Forma bakuna galdurik edo sartu gabe baitu belarrian: *eskertzen dut zu etorria; gero penagarri gerta daiteke gauza bakoitza bere sasoian ez burutua; gehiegi hitz eginaz beste kezkarik ez daukat.* Kopla zahar dotore batek dio: "*Porrusalda mingotsa, arto lizundue, sarritan damutu jat zugaz ezkondue*". Zurekin ezkondu izana. Nahiz eta forma laburrak ondo ezagutu, estilo kontua ere izan daiteke, hots, bati forma luzeak gehiago gustatzea. *Axolagabekeria* aho-betegarriago izan

daiteke *ezaxola* baino; eta nahi bada, argiago edo esplizituago ere bai, hitzak kontzeptuaren definizio osoa hartzen baitu barne. Baina *ezaxola*-k (4 silaba) abantaila funtzional handiak ditu bestearen aldean (8 silaba).

Deklinabidean ere bada etengabe gertatzen den fenomeno bat, kasu mordo bat absolututik ala genitibotik osatu. Arauzkotzat genitibozkoa jotzen da: *guregatik, herriarengatik, herriarengan, amarengana, gizakiarengandik*. Euskaldun erdiek baino gehiagok, ostera, honela diote: *gugatik, herriagatik, herriagan, amagana, gizakiagandik*. Eta horrela diote, ez kontrakzioa egiten dutelako, absolututik abiatzen direlako baizik: *gu, herria, ama, gizakia*. Zergatik ez forma hau ere baliatu, genitibotik harakoa bezain argia eta logikoa bada? Gutxienez, biak aukeran eman behar dira. Neure aldetik, hauetan zein beste okasio guztietan, bi aukera edo gehiago, berdin 'argiak eta bereiziak' daudenean, laburrenaren hobespen sistematikora jotzen dut. Luzea ere erabiliko dut, noski, komenentziak agintzen duenean.

Bizkaieraren eremu handi batean, plurala ere absolututik ateratzen da: *txakurrak* + *gaz* = *txakurrakaz* (k + gaz = kaz); *herriak* + *gaitik* = *herriakaitik* (k + gaitik = kaitik), *herriak* + *gan* = *herriakan* (k + gan = kan); *amak* + *gana* = *amakana* (k + gana = kana). Singularretik pluralera hizki baten aldakuntza besterik ez dago, beraz, baina azentua desplazatzen da. Ez nago ziur horretan salbuespenik baden. Euskalki barruan interesgarria izan arren, pluraleko forma honi ez deritzot batura zabaltzekoa. *Kin* atzizkiagaz ere fenomeno berdina gertatzen da, kointzidentziagaz, gainera, ezen singularra absolututik hartzen duen askok pluralean ere berdin egiten duela. Singularra: *herria* + *kin* = *herriakin*. *Txakurra* + *kin* = *txakurrakin*. Plurala: *herriak* + *kin* = *herriakin*. *Txakurrak* + *kin* = *txakurrakin*. Hizketan, azentuak bereizten ditu singular-pluralak. Kasu honetan ere, arauzko era (*herriekin, txakurrekin*) aukera hobea da baturako, aurreko ataleko 'bereizkuntzen lehentasuna' delakoagatik bakarrik balitz ere.

Hitzen laburkuntza aditz askotan ere buru daiteke, euren sorreran luzatze premiagabera izan den joera alderantzituz. Ez ditut inola ere gaitzetsiko (nola izango naiz, ba, hain ergela!) *ziurtatu, segurtatu, egurkatu, ureztatu, deuseztatu, giltzaperatu, legeztatu-legezkotu, axolagabetu, desbideratu, ospitaleratu*, eta abar bezalako aditzak, baina nahiago ditut, esanahaian bereizkuntzaren bat ez badago, honakoak: *ziurtu, segurtu, egurtu, ureztu, deuseztu, giltzapetu, legeztu-legetu, ezaxolatu-ezaxoldu, desbidetu, ospitaldu*, eta abar. (Ikus aditzaren kapituluan, *Atziki adizgileak* izeneko atala)





## *Hitz berrien sorkuntza*

Orain arteko irizpideak ustez argiak eta zehatzak izan arren, zalantzak maiz agertuko dira, hitzen mugak, batez ere immaterialak direnean, ez baitira beti hain argiak eta zehatzak izaten. Hitz bakoitzak esango du bera holakoa den. Zalantza orduan, hiru aukera posible daude: dudazko hitza bera, ala mailegua, ala hitz berri bat. Edo, agian, bi edo hiru hitzen aukera.

Garbikeria euskararen elgorri handienetakoa izan dela jakiteak ez digu hitz berrien sortzea ukarazi behar. Baliabide horrek lexikoaren iturburu nagusietako bat izaten jarraitu behar du euskararen normalkuntza prozesuan. Kanpotik zer barruratu jakiteak barrutik zer atera dezakegun argi edukitzea eskatzen du. Batzuetan, zein bidetatik jo, zalantzak izango dira, noski. Adibidez, *anbizio, asoziazio, deribatu* niretzat euskal ordain argirik ez duten hitz komunak dira. *Handinahi, irrits, antsia, handikeria, goranahi, gutizia, irrika*, eta abar ez dira *anbizio*-ren ordain argiak. *Elkartze* ere ez, *asoziazio* hitz komunarena. Eta gutxiago, aditz gisan, *asoziatu* onartzen bada. Zenbat kontzeptu ezberdin adierazi nahi izaten den *elkartu* aditz oropresent horrekin! *Deribatu* ere hitz komuna da, eta niretzat *eratorri* ez da ordain argia. Baina ulertzen dut norbaitentzat hitz komun horiek euskal ordain argikoak izatea. Batek uste dezake 'eratorri' orain argia eta zehatza dela, beste batek, ez dela. Orduan eztabaidatu egin beharko.

Hitz asko egongo dira, euskaraz ordain argirik eduki ez arren, hitz berri bat duda gabe eskatzen dutenak. Ez dut uste, adibidez, *lavavajillas, nevera, congelador*, eta abar, horrela hartzea inork defendatuko duenik. Demagun hitz berria sortzea erabaki dugula. Hemen bi sail nagusi daude. Bata, hitza bera, eta bestea, hitz batekiko esamoldeak.

HITZ BERRIAK: Hitz berriak edo neologismoak hiru ezaugarri behar ditu: laburra, argia, osoa. Laburra esatean, ahalik laburrena esan

nahi dut, elkarketak maiz ekarri ohi dituen hitz luzeak ekidinez. Argia edo adierazi nahi den kontzeptua erraz asoziatzekoa. Eta osoa, hots, hitzaren familia osoa aurreikusten duena.

Har dezagun gaztelaniazko '*paro*' kontzeptua. Hemen, gutxienez, '*paro*' eta '*parado*' hitzak sortu beharko dira. *Lan* hitzetik *langabezia* nagusitu da. Kontzeptu errukarria bada ere, ahoa betetzen duen hitza. Ez dago gaizki, baina bai luzea. Langabezia lanik eza bada, *lanez* litzateke hitz argiena eta laburrena: *lanik ez, lan-ez, lanez.* 'Ez' adberbioak atzizki gisan badauka indar eta tradizio ugari euskaran. *Langabezia* edo *lanfalta* ere izan liteke. *Parado,* berriz, *langabe*, ez *langabetu*, noiznahi entzun ohi den bezala. Lanik ez daukana, oro har, *langabe* litzateke. *Langabetu* lana eduki eta gabe gelditzea litzateke. Gaztelaniaz ez dago kontzeptu hori zuzen adierazteko aditzik, '*parar*' ez baita hori. '*Desemplear*', agian. Gehienean, *quedarse sin trabajo, dejar sin trabajo* edo horrelako zerbait erabiltzen da. Euskaraz, beraz, gauza bat da *langabe*, beste bat *langabetu* aditza, eta beste bat honen partizipioa, *langabetua-langabetuak.* Hau langabeen kasu espezifiko bat litzateke. Baliteke *lanez* izena aditz bihurtzea ere: *laneztu*. Ez litzake eboluzio okerra, *ezerez-deusez* = *ezereztu-deuseztu* bezala.

Har dezagun, orain, '*bozeramaile*' hitza. Ingelesez *spokesman*, frantsesez *porte-parole*, gaztelaniaz *portavoz*. Baina hitz honek berak gaztelaniaz bi adiera dauzka: bata *turuta* edo megafonia gisako tresna, eta bestea talde baten izenean mintzo den laguna. Frantsesez hau *porte-parole* da, eta tresna, *porte-voix*. Ingelesez, bata *megaphone*, bestea *spokesman*. Guk euskaraz, *bozeramaile* dela bide, eredurik txarrena kalkatu dugu. *Boz* hitzetik hasi behar bazen, hor zegoen *bozdun*, askoz argiagoa eta laburragoa. Bi silaba bosten kontra. Hitz honek badu beste adiera bat: *boz* = *boto*. Orduan *bozdun* boza edo botoa duena, hauteslea litzateke. Kointzidentzia hori ekiditea komeni al da? Bai, ahal bada. Frantsesaren antzera *hitz*-etik (*parole*) abiatzen bagara, berehalaxe *hiztun* datorkigu. Honek ere beste kointzidentzia bat dakar, *hiztun* hitzak beste adiera bat edo gehiago hartua duelako. Kointzidentzia hori ere ekiditea komeni da, noski. Behin, horretara jarritakoan, ez gara bide erdian geldituko.

*Boz*-etik hasi nahi bada, hor daude *bozdun, bozgin, bozlari... ele*-tik *eledun, elegin... mintzo*-tik *mintzodun, mintzogin, mintzari... berba*-tik





*berbadun, berbagin...* eta beste ahalbide batzuk. Denak *bozeramaile* baino hobeak eta laburragoak. Ez baita hitz hori bakarrik. Hor dago *cargo de portavoz* ere. *Gin* atzizkidun edozein hartuta, hurrengo hitza bertan daukagu: *bozgintza, elegintza, mintzogintza, berbagintza.* Beste atzizkiek ere *bozeramaile*-k baino bide hobea eta motzagoa zabalduko digute.

Har dezagun beste hitz bat: *huelga-grève.* Mailegua hartzekotan, *greba* nahiago dut. *Lanuzte* ere hor dabil, eta ondo deritzot, hitz laburra eta argia baita. Baina *huelguista* eta *hacer huelga* ere esan behar dira. *Lanuzte*-ren senide naturala *lanuzle* litzateke. Eta aditza? *Lana utzi* beste zerbait litzateke. *Lanutzi* zuzen legoke, hitz elkartzearen egitura hain euskaldunaren arabera. Eta, bestela, *lanuztea egin.*

Grebatik ere, *grebatu* aditza bilakaera naturala litzateke. Orduan, *hacer huelga* guretzat *grebatu* litzateke, baina hau intransitiboan jokatuz: *atzo grebatu ginen, egunero ordubetez grebatzen gara.* Eta *grebatu*-tik *desgrebatu* ere jauzi naturala litzateke. Honek *dejar la huelga, salir de la huelga* esan nahiko luke. Baita *desgreba* izena bera ere, greba amaitzearen esanahian. *Desgreba egunean ikusiko dugu hori* = *eso lo veremos el día en que dejemos la huelga.* Hitz honetatik *huelguista* = *grebari.* Baita *grebagin* ere. Beraz, familia honela osatzen da: *greba, desgreba, grebatu-greba egin, grebari-grebagin.* Hartutako maileguari euskarak bere bide propioa eragin dio, eta horretantxe saiatu behar du hizkuntza sanoak.

Lanuztetik honela osatzen genuen familia: *lanuzte, lanutzi-lanuztea egin, lanuzle.* Baina hor daude *huelga de hambre, huelga de sed, estoy en huelga de amor,* eta abar ere, *lanuzte* hitzez esan ez daitezkeenak. Hiztegi oso batek hitz baten maila gramatikalak ez ezik, haren aplikazio ezberdinak ere aurreikusi eta konpondu behar ditu. Bestela, laster hasiko dira honelakoak esaten: *gose lanuztean daude,* edo okerrago litzatekeena *gose-uztean daude,* eta abar. Hori egiten duena gaitzestea hipokresia da, soluziorik ematen ez bazaio. Eta soluzioek hiztegian egon behar dute. Lanuztetik ezin bada, nola egin? Adibidez *gosegintza, gosealdi... Huelguista de hambre* berriz *gosegin, goselari* edo horrelako zerbait. Edo, beste gabe, orain bezala, *gose-greba, gose-grebalari.* Pentsatu eta erabaki egin behar. Horixe da hiztegiginen lana. Nik nabarmendu nahi dudana da kontzeptu bakoitzaren familia osoa (izen, aditz, adjektibo, aditz-izen eta denak)

unitarioki soluzionatu behar dela, eta gero hitz bakoitzaren aplikaera guztiak ere aurreikusi behar direla.

ESAMOLDEAK: Hizkuntzak esamoldez josita daude, eta gehienean, bakoitzak oso bide propioa egiten du, batez ere argotean. Hona gaztelaniazko adibide batzuk: *Tomar el pelo, meter la pata, hacer la pelota, comerse un rosco, pintar bastos, arrimar el ascua, hacerse el loco, tocar madera, hacer cola, estar como una cabra, tocar a rebato, repartirse la tarta, morderse la cola, hacer aguas, estar en la higuera, barrer para casa, echar la casa por la ventana, pasarse de rosca, esperar sentado, eso va a misa, caérsele la baba, pasarse de listo, coser y cantar, irse por las nubes...* Edo: *de rompe y rasga, da cabo a rabo, de chuparse los dedos, muerto de risa, tirado en la calle, de cuerpo presente...* Edo: *sin ton ni son, viento en popa, por los cerros de Úbeda, como alma en pena, a mesa puesta, sin pelos en la lengua, ojo avizor, como gato sobre ascuas, cazando moscas, con el culo al aire, a toda mecha, en el quinto pino, a pelo, en pie de guerra...* Edo: *punto muerto, mieles del éxito, laureles de la victoria, caballero de honor, golpe de efecto, tiro por la culata, tiro de gracia, tiempo de descuento, marcha atrás, muerte dulce, camino de rosas, los pelos de punta, libro abierto, vela en el entierro, puerto seguro, tiempo de vacas flacas...* Edo esaera gisakoak: *a rey muerto, rey puesto; a Dios rogando, con el mazo dando; de tal palo tal astilla; quien tuvo la retuvo; llámame gorrión y échame trigo; haz bien y no mires a quién...* Hauetan, batzuk argotekoak dira eta besteak hizkuntza arruntekoak, edozein mailatan erabiltzekoak.

Euskaraz ere honelakoak ugari dira: *lurra jo, hortzak erakutsi, popatik eman, zorri biztua, adurra-lerdea dariola, asto bedeinkatua, atzea eman, etxekalte, ustel egin, hiruzaku egin, koipea eman, zur eta lur, santua ez bada txerri aska, kopeta zimurtu, palutik eman, -ren lepotik bizi, bostekoa eman, eskupekoa jaso, sorbaldak jaso, odolesteak ordez-odolkiak ordainez...* Baina daukaguna ez da problema, falta zaiguna edo sartzen zaiguna baizik. Gaur hego-euskaldun askoren belarrietan normalak dira *pelota egin, enteratu, hanka sartu, ilea hartu, porkulo bidali, korrupzioarekin amaitu, indioarena egin, erroskatik pasatu, listotik pasatu, faltan bota...* eta abar eta abar. Askotan, erdal-euskal esamolde mistoak ere bai: *a toda hostia bukatu du, a toda mecha zihoan, con pies de plomo ibili behar da, el acabóse izan zen, por pelos aurkitu nauzu, con más pena que gloria amaitu da, negozioa viento en popa doakigu, allá cuidaos besteak, portzierto lehengo batean...* Hau guztia hizkuntza baten erosio handiaren ezaugarri da. Erdararen efektu indartsuagoak baliatzen dituzten umorekizunek (antzerki, tele-dibertsio, txiste-saio...) ez dute gutxi laguntzen erosio hori normaltzen eta zabaltzen.





Har dezagun *faltan bota* esamoldea, azken aldiko kastellanismo mingarrienetakoa, entzunaren entzunak desmintzen bagaitu ere. Zergatik mingarrienetakoa? Alde batetik, nabarmenegia delako, eta bestetik, euskaraz bagenuelako ordain direktoa, hain zuzen, '*falta*' hitzarekin, baina ez *faltan bota,* baizik *falta ukan-eduki.* Zerbaiten falta eduki. Nire euskalkian, behintzat, honelakoak edonork esan ditu, eta esaten ditu orain ere: *Ume honek ama falta handia dauka. Kanpoan jakiten da etxe faltea zer dan. Zatoz arin, zure falta handia daukagu eta.* Baita zerbaiten *faltan egon* ere. *Zatoz arin, zure faltan nago eta.* Eginda geneukana sasira, eta *faltan bota* plazara. Norbaitek esan lezake batetik bestera ez dagoela hainbesteko gorabeherarik, azken batez, dena baitabil *falta*-ren inguruan. Bai, ezta? Pentsatzen al duzu gaztelaniaz nola emango lukeen *tengo tu falta, tengo tu gran falta* edo *estoy en tu falta* entzuteak, batez ere, solaskidea emakumea bada? Lan honi azken berrikusia ematen niharduela, nafar baten ahotik "oraindik sasoi-falta harrapatzen diot" entzun dut irratian, pilotari bati buruz. Eta ez "oraindik sasoia faltan botatzen diot". Ez da, beraz, bizkaierako kontua bakarrik. 'Falta hartu', 'falta harrapatu', 'falta eduki' egitura berdinak dira.

Honekin ez dut inola ere esamolde horien erabiltzailerik kondenatu nahi. Bakoitzak dakiena eta ahal duena egiten du. Baina okerra zuzenari gainditzea oso seinale txarra da hizkuntza batentzat. Eta berriro lan honen helburu nagusira jorik, esamolde horiek hiztegietan ordenatu eta soluzionatu behar dira. Horrela *falta* hitzean hantxe etorriko dira euskal ordainak, 1. 2. 3. eta behar diren adiera guztiekin. Eta gero hitz horrek erdaraz sortzen dituen esamoldeak: *Echar en falta, hacer falta, caer en falta, sin falta...* Berdin *faltar* aditzean. Dauzkan adieren euskal ordainak, eta ondoren esamoldeak: *faltar a la verdad,* eta abar. *Pelo* hitzean ere, *tomar el pelo, ponerse los pelos en punta, con pelos en la gatera, por pelos, a pelo. Pata* hitzean, *meter la pata, a la pata coja, pata de gallina, a cuatro patas, a la pata llana, patas arriba, tener mala pata...*

Ez da lan erraza, noski. Lehenik, lan doblea egin behar da, gutxienez bi erdaratatik euskaratu beharko baita, gaztelaniatik eta frantsesetik. Eta horrelako esamoldeetan oso kointzidentzia gutxi egongo dela jo behar da. Zailtasunik handiena, hala ere, ordain egokiak aurkitzean datza. Batzuetan, esamolde baten ordain literala ondo egongo da. *Viento en popa*, adibidez, irudi naturala eta unibertsala da. Nola ondo itzuli izango da kontua, oso antz-antzeko besteren bat ez badago. Horrelakoak al dira *meter la pata, hacer la rosca, ser un pelota, terminar con, pasarse de, de tripas corazón, estar en la luna, subirse al carro*, eta abar? Ez, noski, eta orduan euskal ordain zehatz samarrik baden ondo miatu beharko da, eta ez badago, egoki bat sortu. Argi dagoena da ezin dela hiztegi 'oso' bat bururatu, esamolde hauen gehigarri ahalik zabalena ez badarama. Bestela, laster bihurtuko gara (ari gara bihurtzen) espainolaren edo frantsesaren zabortegi.

## Dedukzioa

Hiztegi bat ganoraz egiteko, zenbait irizpide argi eraman behar dira. Garrantzitsuenetakoa analogia da, lan honetan zehar maiz agertu dena. Eta dedukzioa? Baita ere, neuk uste. TU-DU atzizkiz amaitzen den aditz batek aurreragoko izenik ez adjektiborik ez badauka, nondik dator? Esaterako, '*askatu*'. Atzizki horrek aurreko zerbaitetik datorrela adierazten du, euskaratik begiraturik, behintzat. *Asto-astotu, gazte-gaztetu, gorri-gorritu*. Zein da *askatu*-ren azpian dagoena? Ba, '*aske*' edo horrelako zerbait behar zuen. Eta ez, agian, arrazoi deduktiboz, baina halaxe asmatu zen '*aske*' neologismoa. Baina neologismoa dela emanik ere, argi dago *aske* eta *urrutizkina*, esaterako, ezin direla konparatu.

Badakit TU-DU atzizkidun aditz guztiak desmuntatzen hasteak ez daukala zentzurik, asko latinetik edo erdaretatik zuzen baitatoz, aditz gisan. Baina euskarak atzizki honi bere garapena eragin dio, eta baldin, bera erantsiz, edozein hitz adizteko modua badauka, alderantziz, atzizki horrekiko aditzak deskonposatzera gonbidatzen du, euskaldunek behin baino gehiagotan egin dutenez. *Tiratu, sakatu, erretiratu* aditzetatik *tira, saka, erretira* izenak deduzitu dituzte. Horrela, *tira* da *tiramena, erakarmena* eta *saka* da *sakada, bultzada*. Esaera hau, adibidez, Bizkaian oso naturala da, edo izan da: *plaziek ez badeko sakarik, gauziek ez deko tirarik*. *Tira* hitz hori, izen gisan, euskaldun guztiok ezagutu eta noiznahi erabili dugu, bizkaieraz behintzat. *Jeneroak ez dauka tirarik, badauka tirarik, arrainek tirie galdu deu*, eta abar. *Saka* ere berdin, hain erabilera hedatuan ez bada ere. Beste euskalki batzuetan, *erretira* izen arrunta da, *erretiro* edo *erretirada*-ren sinonimotzat.





Zer dago *bukatu*-ren azpian? Gaur ezer ere ez. Noizbait egon bazen, galdua dago. *Buka* edo *buku* izentzat hartzea arbitrarioa ote litzateke? Demagun diodala: *hemen gaude ez has ez buka*. Eta ondoren norbaitek dio: *auzi horrek ez baitauka ez hasterik ez bukurik*. Aditz erroa izen bihurtu dugu. Eta lanak leudeke tranpa okerra dela frogatzen. *Ordaindu, aldatu, barkatu, gogaitu, aspertu, amaitu, lehertu, aipatu, hautatu, bultzatu*... Aditz hauen erroak hitz jakinak dira eta hortxe daude: *ordain, alda, barku, gogait, asper, amai, leher, aipu, hauta, bultz*. Baina ezin ditugu izentzat identifikatu, eta orduan, *ordainketa, aldakuntza, barkamen-barkazio, gogaitasun, aspertasun-asperdura, amaiera, leherketa, aipamen, hautaketa, bultzada*, eta horrelako luzapenak eragiten dizkiegu.

Batzuetan, argi dago euren izentasuna, aditzak bi forma sinonimo baitauzka: *deitu-dei egin, gogaitu-gogait egin, bultzatu-bultz egin, lehertu-leher egin, laketu-laket izan*... Beste batzuetan, aditz bikoitz forman ezagutzen ez baditugu ere, atributu gisako esamoldeak sortzen dira: *asper-asper eginda nago, asper-asper egin arte* = zeharo aspertuta nago, erabat aspertu arte. *Leher* konplementu gisan: *leherrak egin, leherrak egin genituen* = lehertu arteko ahaleginak egin. Honek guztiak esan nahi du hitz horiek euren berjabetza daukatela.

Baliabide honen abusua egiazko arriskua da, noski. Euskara garbizaleak sarritan puskatu ditu hitzak nahiko era arbitrarioan. Horrek ez du ukatzen era egoki bat ere badagoenik. Ez dut inola ere esango *aldaera, barkazio, gogaitasun, amaiera, aipamen, hautaera, bultzada*, eta abar gaizki daudenik. Baina oinarri onez, *alda, barku, gogait, amai, aipu, hauta, bultz, ok, uko, bulk, tenk, pot, kosk, eurt, axut* bezalako hitzen kontzisioa alferrik galtzea ere penagarri da, ez hainbeste hitzengatik eurengatik, hizkuntzak eskaintzen duen baliabide bategatik baizik. Baliabide hori, garatu beharrean, ezabatuz doa, eta hori, behintzat, ezin da aurrerapentzat jo.

## Euskal hitz guztiak nola

Irudikatzen dudan hiztegi oso horretan, euskal hitz guztiek egon behar dute. Guzti-guzti-guztiek! Irizpide honetan ez daukat duda izpirik. Hala ere, enuntziatu orokor horrek zenbait zehazpen behar du.

ALDAERAK: Hitza diodanean, hitz diferentea diot, ez hitz baten aldaera ezberdinak. *Mitxelot, mitxoleta, mitxilote, tximeleta, txipilota* eta beste hainbat forma hitz beraren aldaerak dira. Hauek denak nonbait edukitzea ondo dago, baina hiztegi osoan ez zaizkit interesatzen, zerbait diferentea adieraz dezaketenean ez bada. Eta adierazten ez badute, hartara eraman daitezke. Orduan aberastasun dira, eta horrek hiztegian agertu behar du. Hitz eta kontzeptu beraren aldaera soilak badira, aberastasun baino areago dispertsio dira.

SINONIMOAK: Hitz diferenteak izan arren, kontzeptu beraren adierazle izan daitezke. Arestian aipatu tximeletak badauzka sinonimoak: *pinpilinpauxa, pinpirin, jainkoilo,* eta abar. Hauek hitz diferenteak dira eta, beraz, barruan behar dute, baina ez erdarazko *mariposa-papillon* hitzen ordaintzat. Intsektu horrek hitz bakarra edo bi gehienik behar ditu. Beste hitzekin zer egin? Ba, agian, tximeleta mota ezberdinak bereizi, agian, pinpilinpauxa ipuinetako tximeleten izena izango da, edo, agian, *pinpirin,* adibidez, adjektibo izan daiteke, oso polita eta airosoa adierazteko. Edo beste adiera batzuk ere eduki ditzake, eta orduan ez dago problemarik. *Hatz-erhi, lepo-sama-idun, ate-borta, zakur-ora, lapur-ohoin, ostu-ebatsi-lapurtu, eraman-eroan, zaunka-adausi, aurre-aitzin, atze-gibel, bildots-axuri-arkume,* eta abar, hitz diferenteak dira, eta denek egon behar dute hiztegian. Kontzeptu ezberdinetara edo kontzeptu baten ñabardura ezberdinetara eraman ahal izanez gero, hobe. Bestela, sinonimo soil gisa. Utz erabilerak eta denborak bakoitzari bere tokia eman diezaion.

## Euskal hitzen erdal ordaina

Erdal-euskal hiztegiaz ari garenez gero, ez da problema txikia izango euskal hitzak zein erdal hitzetan aurkitu behar ditugun. Adibidez, *etxe, jan, sakon* non kokatu ez da zaila, erdaraz ordain zehatzak baitauzkate:





*casa-maison, comer-manger, profundo-profond.* Baina hitz askok ez du erdaraz ordain zehatzik edukiko. Orduan, lehenbizi delako hitza ahalik zehazkien eta hitz gutxienez definitu beharko da. Har dezagun, adibidez, '*arazo*' hitza. Hau, batez ere, bizkaierako hitza izan da, eta penagarri da, bere jatorrizko esanahia galdurik, behar ez zuen esanahira eramana izatea. Gaur *arazo* Euskal Herri osoan ezagutzen da, *problema* esanahian. Maileguen irizpiderik estuenean ere, *problema* onartzeko ez genukeen problemarik izan behar. Matematikan hainbeste kosta ohi den problematik jauzi berezko eta hurbil-hurbila dago beste zentzu figuratura, zerbait zail eta neketsura, alegia.

*Problema* hitzaren bigarren adiera horri *arazo* egokitu diogu. Hitz honen jatorrizko esanahia zeregina edo egitekoa da, baina ñabardura batez, hots, zeregin endredosoa, kostatzen dena, gogo handiegiz egiten ez dena. *Umea gauza polita da, arazorik emongo ez baleu. Ganaduak arazo handia dauka. Etxean beti dago arazoa. Ahuntzak arazoa besterik ez dakar.* Hauetan guztietan eta beste milatan, *arazoak* beti dauka zerbait erara ez datorren kutsua. Ahuntzak *problemak* ekar ditzake, baina hemen ez du hori esan nahi, baizik hura lotu, aldatu, katean trabatuta dagoen ikustera joan behar, ihes egiten badizu, harrapatzen lanak, landareak jan, eta hori guztia. Lan aldrebes eta bihurri samarra, ahuntza bera bezalakoa. Adiera hori eman izan zaio, orain bestea nagusitu bada ere. Zer egin dugu, irabazi ala galdu? Niretzat, galdu, duda gabe. Kontzeptu bera esateko bi hitz dauzkagu, *problema* eta *arazo* (alferreko lana), eta kontzeptu dotore bat galdu dugu.

Hitz horri ematen zaion beste adierak, *asunto, cuestión* alegia, bidezkoago dirudi. *Hori ez da nire arazoa. Hor konpon bakotxa bere arazoakaz. Baztarrak nahasteaz beste arazorik ez daukazu?* Hauetan ere, *arazo* hitzak lan edo zeregin zentzua dauka, baina gehiago, ardura, eginbehar, asunto edo horrelako zerbait legez.

Goazen orain *arazo* hitza erdal-euskal hiztegian kokatzera, bere esanahi originalean. Gaztelaniaz ez dut horren ordain izan daitekeen hitzik aurkitzen. Nik baino gehiago dakienak edo nik baino hiztegi osoagoak darabiltzanak, agian, aurkituko du. Baina demagun hitz bakarreko ordain egokirik ez dagoela. Orduan, bi hitzez *ocupación enredosa* edo horrelako zerbait litzateke. Horixe definitu behar da ahalik zehatzen.

Beraz, *ocupación* hitzean, honi dagozkion adiera guztien ondoren, letorke: *Ocupación enredosa*: arazo. Edo horrelako zerbait.

Atal hau amaitzeko, euskal hitz guztiek joan behar dute aurrera. Baita arkaikoak eta galdutzat daudenak ere, kontzeptu edo ñabardura bat aportatzen badute. Euskalkien altxorra galduko ote den eta hori guztia funts gabeko beldurra da, gauzak ondo egiten badira. Eta gauzak ondo egiteko, euskalki guztietako hitz eta ñabardura guztiek joan behar dute aurrera, ezer interesagarririk aportatzen ez duten aldaerak ez badira. Inork ez du eduki behar bere hitz bat kanpoan geldi dadin kezkarik, edo gelditu izanaren erreminik. Beste kontu bat da hitz guztiak nola eskumendu, oraindik asko eta asko, hiztegietara ez ezik, paper idatzira ere iritsi gabe baitaude. Baina nolabaiteko konstantzia daukatenek, behintzat, denek biziraun behar dute euskararen altxorrean. Horrela, hitz berriak jaso eta sortu ahala, hiztegia etengabe handitzen eta osoagotzen joango da.

## *Euskal-erdal hiztegia*

Erdal-euskal hiztegiarekin batera, euskal-erdal hiztegia ere beharrezko da, noski, biek elkarren alderantzizko osotasuna eginez. Batera esan dut, seguruenik, biek liburu bereko bi zatitan argitaratu beharko liratekeelako, helburu eta erabilera praktikoari jarraituz, baina argi dago lehen-lehenik euskal-erdal hiztegia burutu behar dela. Zer daukagun argi jakin behar dugu, zer falta dugun hautemateko. Hemen, beste zenbait gakoz gainera, problema handia sortuko zaigu sinonimoekin. Hitz guztiek hiztegian sartzeko eskubidea badaukate, zer egin behar dugu kontzeptu berari hainbat euskal hitz ezberdin dagokionean? Soluzio bat izan daiteke denak jaso eta zerrendan ematea, beste gabe, dispertsioa lehenean utzirik. Beste bat izan daiteke denak ematea, baina halako preferentzia batzuk proposatuz. Hiztegiak, bilduma soila ez ezik, gidari izan behar du, soluzioa proposatu behar du, eta horrek sarritan koska latzak ekarriko ditu. Baina lantaldeak, hiztegigileek, benetako ekipo nazionala osatzen badute, euskalki guztien benetako ordezkariak badira, soluziorik onena izateko oinarri guztiak daude. Gehienean, irizpide batura eta bakarrera iristen saiatuko dira, baina dudazko auziak dudan utzita ere, ez da ezer gertatzen, eta hori ere adierazteko modu bat egon behar du.





Euskal-erdal hiztegiari erdal-euskal hiztegiak darraionez, arretarik zorrotzena beharko da, ahalik araberakoen izan daitezen. Biak osoak eta biak elkarrekikoak, batetik bestera desorekarik eta, gutxiago, kontradikziorik sortu gabe. Bihoaz pare bat adibide. Erdaratik euskarara *'definir'* hitzean *'definitu'* onartu bada, gero euskaratik erdarara *'zehaztu'* hitzari ezin zaio *'definir'* esanarazi. *Zehatz, zehaztasun* hitzen erdal ordaintzat *exacto, exactitud* eman baditugu, *definitu* kontzeptua eremu horretatik at geratzen da. Hitz batek, kasuon *zehatz*-ek, adiera bat baino gehiago eduki dezake, noski, baina inoiz ere ez *definir, definición* eta abarren eremuan sartzeraino, hau *definitu* hitzetik hartua izan bada.

Erdarazko *prudent, prudence* euskaraz *prudent(e), prudentzia* gisan onartzen baditugu, gero ez dezagun *zuhur* hitza adiera horretara luza. Hitz batez, ondare komuneko maileguek eurek markatuko digute zeintzuk euskal hitz eremutik kanpora dabiltzan eta, beraz, nora itzularazi eta non definitu behar diren. Hitz baten eremua ez daiteke, nolabaiteko analogiaren izenean, inguruko eremuetara zabaldu, azkenean, denak gutxi gorabehera eta bat ere ez zehazki adierazteko. Euskararen inprezisio horixe garbitzera letorke, besteak beste, ondare komuneko maileguen irizpidea, zeinak milaka euskal hitz bakoitza bere tokian birkokatzea eskatuko duen.

## *Nazionala*

Erdal-euskal hiztegi osoa eta honekin baterako *Sortzaindia* eta *Zuzentzaindia* planteatzean, badakit ez dela lau txori-bururen eta bost txori-txikiren kontua. Lantalde zabala eta finantzabide lodia beharko litzateke. Zeren, nola hiztegi osoa eta fidagarria burutu? Hor dago untzea. Eta edozelako untzea ez denez gero, ezin da edozelan egin. Erdi alferreko izango den beste hiztegi bat gehiagorekin ez dugu ezer aurreratzen.

Hiztegi horrek, lehenik, nazionala izan beharko luke, Hegoaldean, Iparraldean eta euskararen diaspora guztian –Bartzelonan, Bruselan, Madrilen, Parisen, Argentinan, Renon, Toronton...– balio izateko modukoa. Nola lortu balio hori?

Egikeran talde handiak eta Euskal Herri osoaren errepresentatiboak

beharko luke partaide. Bai irizpide orokorretan, bai xehetasunetan, kontsentsu zabala lortu behar da. Zabala, baina zehatza, ez gutxi gorabeherakoa. Politikan ezinezko edo zaila dena, hizkuntzan, beharbada, daitekeena da. Ez dauka kontsentsu guztizkoa izan beharrik, ez denena, ez denean, baina bai efikaza izateko bezain zabala eta zehatza.

Lan osoa eta ona egin behar da. Hori, teorian, lagun bakarrak edo talde txikiak egin dezake, baina euskararen une honetan, normalkuntzan bete-betean ari denean, ezinezkoa da horrelako hiztegi bat, lagun bakarrak ez ezik, talde batek ere egitea, euskararen ordezkotza osoa segurtatzeko aniztasunera heldu ezik. Orain ez naiz hau guztia nola burutu aztertzen hasiko. Plangintza argia diseinatu behar da, praktikak eta ahalak zehaztuko duena. Nik, proiektuaren urgentziaz batera, irizpide eta ildo batzuk proposatu ditut.

*Nazional* hitzari ez diot inolako kutsu politikorik ematen –abertzale, ezker, eskuin, espainoltzale, frantseszale...–, ebidentzia baten zentzua baizik. Hiztegi nazionalak ez du besterik esan nahi euskararen eremu guztia hartu eta integratu behar duela baino. Hegoalde guztia, Iparralde guztia eta diaspora guztia. Oinarri-oinarrian hortik abiatzen eta kontzienteki horixe lortzera ez bagoaz, lan sektarioan dihardugu; probintzianoak gara. Denok batera ere zenbateko probintzia osatzen dugu, ba?

## Aukeren mugatzailea

Hiztegian, bai lexikoan, bai hitzen forman eta bai arlo guztietan, sarritan dudak egongo dira. *Deribatu* ala *eratorri* ala biak? *Polea* ala *polei*? Ala *txirrika* bakarrik? Ala biak, *txirrika* eta *polea*? Batzuetan, bi aukera baino gehiagoren arteko duda sortuko da. Hiztegiak ez du inola ere monolitikoa izan behar, baina ezta dispertsoa ere. Batu egin behar du, ez banatu. Gidatu ere egin behar du, erabiltzailea noraezean utzi gabe. Horretarako, dudak erabat zehaztu behar dira, eta ahalik aukera gutxien proposatzen saiatu, hiztegiaren hobespena ala neutraltasuna kasu bakoitzean adieraziz.

Sarrerarik gehienetan, zabaltasun guztia bi aukeratara ekartzea oso daitekeena dela ikusi dut, edo hori iruditzen zait, behintzat. Orduan, finkapena edo azken erabakia erabileraren esku utz liteke. Oraingo





egoeran, auzi asko erabileraren esku uztea falazia bat da. Sarritan aipatzen den hizkuntz lege ustez emankor eta libre horrek ezina edo etsipena darama azpian. Norabide higakorrak berez ez dira oneratzen. Hizkuntza osasuntsuetan, erabilera aski gidari izan daiteke, baina gure kasua ez da sanoegia, zoritxarrez. Hemen, erabilerak, erreferentzia sendo bat gabe, okerra finkatzen eta zuzena okertzen lagun dezake. Bestelakorik uste duen ilusorik bada, goragoko oker zerrendaren eta beste ehunka horrelakoren norabidea ikustea dauka. Eta lexikoan oraindik dagoen indefinizioa eta noraeza ikustea dauka. Eta horren ondorioz datorren gaztelaniatze azkar eta indiskriminatua. Eta idazleek darabilten euskararen dispertsioa. Eta kale hizkuntza parrastan konkistatzen ari den "euskañola". Egia da, hiri eta herri askotan, gaur inoiz baino euskara gehiago entzuten dela, baina bai euskara horren kalitatea problematikoa dela ere. Erabilerak ordenatuko al du hori? Ez daukate freskura makala argumentu horrekin dabiltzan hizkuntzalariak. Ez dut inola ere uste delako hiztegia gaitz guztien sendakin miragarria izango denik. Inork horrelakorik ulertu badit, beste oker bat gehiago egin du. Baina bai diot horixe dela lehen premia, hots, hiztegi oso eta bakar bat gabe ez dagoela ezer ganoraz planteatzerik.

## Batasuna eta aniztasuna

Saiakera honetan adierazten saiatu naizen moduan, arlo nagusiak, hots, batasunean eta hizkuntzaren normalkuntzan ezinbesteko garrantzia daukaten hutsuneak bete eta finkatutakoan, euskalki arteko zenbait diferentziari ez nioke bat ere muzinik egingo. Hiztegi nazionalean, aldaeren sarrera kontrolatu egin beharko da, baina hiztegi lokaletan, eta batez ere, praktikan, zenbait diferentzia eskertu egingo nituzke. Badira hitz asko, oso erabiliak eta garrantzitsuak, segun non, halako aldaera hartzen dutenak: *erten-irten-urten, eduki-euki, erruki-urriki-urrikalmen, ule-ile, sur-sudur, ateri-aterri, etzan-etzun, bidali-bialdu, atera-etara, ageri-agiri, igeri-uger, ikutu-ukitu- hunkitu, barri-berri, aitzaki-atxaki, jardun-ihardun-iharduki, ahaztu-ahantzi-atzendu, eseri-jesarri, zulo-zilo, lore-lora, jaiki-jagi, jarraiki-jarraitu, gau-gaba, mutur-mustur,* eta abar.

Beste batzuk sinonimoak dira: *apaiz-abade, alkate-auzapez, aitatxi-aitaso-aitajaun-aitaxe-aitita-aitaita-aitona-aitagoi-aitañi...*

eta berdin *amatxi, amama...* eta denak. *Larunbat-zapatu, izeba-izeko, igande-domeka,* eta beste asteko egunak eta urteko hilak. *Etorri-jin-heldu, bezala-legez-lez, ostu-ebatsi-lapurtu, lapur-ohoin, kale-karrika, hanka-zango, irten-jalgi-atera...* Edo zenbait atzizki forma: *okasio-okasino-okasione, salbazio-salbazino-salbazione, bizitze-bizitza, heriotze-heriotza, delako-delakoz-delakotz...*

Horrelako formak bakoitzak bere erara erabilita, ez da ezer galtzen, eta hiztegi nazionalean ere aurki daiteke adierazteko moduren bat. Batez ere, hitz hurbilak eta afektiboak (*aitona-aitita-aitatxi...* asteko egunak eta gisakoak) bakoitzak lasai erabiltzeko aukera zabaldu behar da, batasuna lesionatzen ari den sentipen errudunik gabe. Oso hitz egunerokoek eta entzunek ez dakarte dispertsio arriskurik, kolorea baizik. Eta, bide batez, batua maitagarriago egingo da, eta ez etsai.

Auzi horrek irakaskuntzan eta euskararen ikaskuntzan aplikazio zuzena dauka. Irakaskuntzako hizkuntz edukiak birplanteatu beharra dago, batez ere, adin txikietan. Ez dago ontzat jotzerik *martitzena, eguaztena, eguena, barikua, zapatua, domeka* esanez etxetik doazen umeei, ia aste osoa zapla apurtzea eta, ondorioz, eskolako hitz berriak etxeko, herriko eta euskalki oso bateko hitzekin enfrentatzea. Euskara batua ez daiteke izan plano guztietan indiskriminatuki sartzeko eskubidea daukan super-egitura. Hori batasuna barik, inbasioa da. Eta biak irtengo dira galtzaile, bai batua, bai euskalkia.

Nahiz eta testugintza –eta klaseko hizkera bera ere, oro har– batuan izan, hitz hurbilago horiek irakaslearen ahoan behar dute, eta zer esanik ere ez, ikasleen arteko solasean eta jolasean. Ez dago inongo problemarik *martitzen-astearte* hitzen ezagutza batera eramateko, orientapen mimimo batez. Hitz multzo baztergaitz hori zeintzuk eta zenbatek osatzen duten ebatzi egin beharko da, eta ez da zaila, hartara jarriz gero, muga matematikoki zehatzetara makurtu beharrik ez baitago. Asteko egun-izenak, familia-izenak (*aitita-amama, aitajaun-amandre, aitatxi-amatxi...*), izen afektiboak, eguneroko lexiko noiznahikoa (*urten, itzartu, jausi, astiro, txarto, ederto, polito, berba, behar egin, eroan, gagoz-zagoz-dagoz, ugazaba, gura...*), eta abar eta abar. Hau ez da multzo hori definitzeko tokia, definitu beharra azaltzekoa baizik. Adibideok bizkaieratik hartu ditut, bakoitzak





bere euskalkitik egin behar duen legez. Baina susmoa daukat bizkaieraz beste euskalkietan hobeto aplikatzen dutela irizpidea. Bizkaitarrok gara geure euskalkia ezelako baldintza barik entregatzen aurreratuenak. Eta, jakina, hizkuntz politika orokorra ez da arduratu geuk exigitzen ez duguna programatzen.

Euskalki barruan ere, batuak tokian tokira egokitu behar luke, hizkera mailan. Zergatik '*eguakoitza*' dioten oinatiarrek, edo '*txixazijja*' dioten lekeitiarrek, edo '*aubea*' dioten txorierritarrek, edo '*asago*' dioten uribe-kostarrek, edo '*amaxea-aitexea*' dioten arratiarrek, eta abarrek eta abarrek, euren betiko hitz horiek eskolan bazterturik ikusi behar dituzte? Irizpide honek irakasleei ahalegina eskatzen die, batez ere, tokiz aldatzen direnei. Ba, horrela gehiago ikasiko dute, eta sare konpententeagoa edukiko dugu. Ez litzateke batere zaila, borondate minimo batekin. Baina borondate minimoak ere politika orokor minimoa eta horren araberako programakuntza behar du. Hor dago koska eta hor dago hutsunea, Bizkai aldean nabarmenegia. Bizkaieraren eremuan, ez luke euskaldun alfabetaturik egon behar, bizkaieraren ezagutza minimo bat gabe, gutxienez, ohikoenak diren hitzetan. Horretarako, minimo hori definitu eta tituluen edukietan sartu behar da.

Bizkaieratik kanpora ere, Euskal Herri osoan, euskararen ikaskuntzak, eta areago titulu batek, euskalkien ezagutza minimo bat eman eta ebaluatu behar luke, erantzupena bakoitzaren borondate exotikoaren arabera utzi gabe. Hemen garatzeko baino arlo luzeago eta sakonagoa da bera, baina ziur nago problema ez dela ikasleena, irakasleena baizik; eta hauena ere ez hainbeste, kontzientzia orokorrarena baizik. Eta kontzientzia orokorra taxutzeko tresna bakarra hizkuntz politika orokorra da. Maila horretan, auzi asko eta astiro birplanteatu beharra dago, batuaren onerako eta euskalkietako euskaldunen –gehienen– osasunerako.

# ZUZENTZAINDIA

Hizkuntza normalduetan okerrak berez zuzentzen dira, hots, hizkuntzak berak dauzka zuzengailu automatikoak, arazo arrunt eta nagusietan, behintzat. Norbait gaztelaniaz "*se levantó y andó, tengo caliente, en el camisa*" eta gisakoak esaten edo idazten deskuidatzen bada, laster etorriko zaizkio balak alde guztietatik. Ez da behar inolako *Zuzentzaindirik*, hiztunen gehiengoa oinarrizko zuzentasun horren jabe baita. Nire aholkulariak dio: "Ez nago guztiz ados. Adibidez, leismo, loismo eta laismoarekin erdal jende gehiena nahikoa galduta dabil". Sinesten dut hori egia dela. Hala ere, baiezpen nagusiari euts dakiokeela uste dut, euskara, gaztelaniaren aldean, ahulgune handian bizi baita, oro har.

Zoritxarrez, euskararen kasua ez da hori. Hemen zuzenak nahiz okerrak lizentzia berdinez korritzen du, batez ere, irrati, prentsa idatzi eta telebistan. Etsi egin behar al dugu? Ala utzi, beste gabe, ibiliak zuzenduko duelakoan? Askatasuna eta espontaneitatea dohain ederrak dira, baina segun norantz. Erosio-legea berez ez da zuzenkorra, jarraikorra baizik. Bere kasa, erosioa gehituz joango da. Hiztegi oso horren inguruan, berau

ere utopia handiegia ez bada, antolakuntza iraunkor bat behar genuke, hizkuntzaren okertze nabarmenak, behintzat, sistematikoki eta efikazki zuzentzeko.

Hona adibide mordo bat, egunero entzunez edo irakurriz, ia normal bilakatzen ari zaiguna.

PARTITIBOA: Gauzak ustez hobeto eta dotoreago egin nahiak partitiboa nonahi sartzea ekarri du. Partitiboaren berezko tokia –ezezkoa, galderazkoa, baldintzazkoa, eta abar– baiezko perpausetara hedatzeko mania sartu da. *Badago astia, badaukat aukera, badute gogoa...* esan beharrean, *badago astirik, badaukat aukerarik, badute gogorik,* eta horrela. Baiezko perpausetan partitiboa gaizki dago, oso kasu bakanetan izan ezik. Kasu horiek elipsi baten ondorioz heldu dira. *Badago asti(rik) asko, badaukat aukera(rik) ugari, badute gogo(rik) aski* eta gisakoetan, bigarren terminoa (*asko, ugari, aski,* edo antzeko bat) ezabatzean gelditzen den esamoldea da baiezko partitiboa. Aniztasun edo ugaritasun esanahi hori daukanean bakarrik dago ondo. *Bada hemen lanik, beste munduan ere izango da horretarako denborarik, oraindik geratzen da gurean dirurik, bazen han jenderik...* ondo aplikaturik egoteko, *lan handia, denbora luzea, nahiko diru, jende asko* esanahia eduki behar dute. Gehienean, argi dago ñabardura hori tokiz at dagoela, konplementu soil bat besterik ez baita.

BATEAN-BATETAN: *Bat* zenbatzaileak, tradizio baten arabera eta zenbait kasutan, bi deklinabide dauzka: *batean, batetik, bateko, batera* eta *batetan, batetatik, batetako, batetara.* Hegoaldean ez dira bereizten. Ona al da bereiztea? Bai, noski, ofizialki baztertua izan bada ere. Bereizkuntza aberastasuna da, beti ere, baina ondo bereiztekotan. Lehenengoan, zenbaitzaile zehaztua da, zenbaki garbia. Bigarrenean zenbaki berak beste funtzio bat betetzen du, zehaztugabea, askoren arteko bat, baten bat: *Lehen, etxe bitan bizi ginen, baina orain batean bizi gara.* Hemen bistan da bigarren '*batean*' hori zenbatzaile zehaztua, zenbaki garbia dela. Etxe bat edo bakarra, biren kontraposizioz. *Han bizi gara nonbait, Bilboko kale batetako etxe batetan – Biok etxe batean bizi al zarete? – Etxe batean eta gela berean.* Hemen, lehenbiziko biak zehaztugabeak dira. Hurrengo biak zenbatzaile zehaztuak dira, zenbaki garbiak.





Badirudi askori kosta egiten zaiola bereiztea. Saiatzen dira, baina ez dute asmatzen. Ondo ez bereiztekotan, hobe da deklinabide bakarra erabili. Adibidez, "*ordu batetan amaitzeko lana da*" edo "*ordu batetako entrenaldia egiten dute egunero*" ezin dira inola izan. Lehenengoak ordu batean edo ordubetean amaitzeko lana behar du, eta bigarrena ordu bateko edo ordubeteko entrenaldia. Ordu bat edo ordubete, ez bi edo hiru edo lau ordu, bat eta bakarra baizik. "*Eta minutu batetako isilaldia egin zuten*". Ez! Minutu hori '*bateko*' da. Minutu bat isilik, ez bi, ez hiru, bat baizik. Berdin "*ordu laurden batetako atsedena*". Ordu laurden batetako atsedenik ez dago, ordu laurden batekoa baizik. "*Joaldi batetan baloia beste ateraino bidali du*". Ez! Hori joaldi '*batean*' da, joaldi bakarrean. Izan liteke, geroago kontaturik, eta jokalari baten balantzea egiten ari dela, egoki esana gertatzea: "... *eta joaldi batetan, baloia beste ateraino bidali zuen*". Hemen, suposatzen da beste joaldi batzuk ere aipatu direla, eta haietako bat, zein zehazten ez dena, izan zen beste ateraino bidali zuena. Baina telebistan eta begien aurrean ikusten ari garen jokaldi jakin bat eta bakar bat deskribatzen digunak ezin du '*batetan*' esan.

*Bat* eta *bata* ere bereizten dira bizkaieran. "*Ume bi dauzkagu, bata sei urtekoa eta bestea laukoa*". "*Andra-gizonen kontua sarritan izaten da batak hau besteak txau*". Edo demagun lasterketa batetan bakoitzak bere zenbakidun dortsala daramala, eta amaieran esan daiteke: "*Lauak egin du lehenen, eta batak bigarren*". "*Oraintxe esango dizuegu nor den laua eta nor den bata. Bai! Laua, Pelliccioli, eta bata, Tertziopelli*". Hemen *bata* eta *laua* gaztelaniazko *el (número) uno* eta *el (número) cuatro* dira. Zenbatzaile mugatuak.

*Bestea* eta *beste bat* ere askok ezin dituzte zuzen erabili. *Beste gauza da. Beste kontua da.* Hauek gehienean *beste gauza bat, beste kontu bat* dira. Gaztelaniaz ere *otra cosa* (beste gauza bat) eta *la otra cosa* (beste gauza) oso ezberdinak diren bezala.

BAT-BETE: Neurri hitzekin bezala (*botila bete, zaku bete, kikara bete...*), denborazko zenbait hitzekin ere, *bat* ordez *bete* erabiltzea ondo dago. *Urte bat egin du Ameriketan = urte bete egin du Ameriketan.* Gero *bete* hori hitzari erantsi zaio, *bat* denean: *urtebete*. Joko hau, batez ere, *hil* izenaren kasuan nabarmendu da, zeina, aurretik zenbakia daramanean,

*hilabete* bihurtu ohi den. *Hilabete iragan da*, eta gero besteetan ere, *bi hilabete, hiru hilabete... zenbat hilabete, hainbat hilabete...* Baina hitza 'hil' da, ez *hilabete*, eta zenbakietan bakarrik erants dakioke –ez derrigor hauetan ere– *bete* gehigarria. Bestela, *datorren hilean, hilaren hamaseian; gaur hilaren bosta da, hilak egin ditut etxetik irten gabe, urteko hilak hamabi dira*, eta abar esan behar da, ez *datorren hilabetean, hilabeteak egin ditut etxetik irten gabe*.

*Bat* zenbakiaren ordezko *bete* hori zergatik gelditu zaio lastra gisan *hil* hitzari? *Hil*-en beste esanahiarekiko ekibokoa saihestearren, seguruenik; *zenbat hil, lau hil, bost hil...* hildakoak ere izan baitaitezke. Hori ez da gertatzen, edo ez du gertatu behar, besteekin: *ordubete*, baina *bi ordu, hiru ordu, zenbat ordu...* Berdin *astebete*, baina *bi aste, hiru aste, zenbat aste...* Edo *urtebete*, baina *urte bi, hogei urte, hainbat urte...* eta inola ere ez *hiru ordubete, lau astebete, bost urtebete... Hil* da salbuespena, esandako arrazoiagatik, eta zenbatzaileekin bakarrik. Badakit 'hilabete' formak 'hil'-en esanahi orokorrean ere baduela tradizio zaharra, baina hobespen bat onartzekotan, arrazoia argi dago azaldutako bereizkuntzaren alde.

*Bete*-k badauka, hitzak berak dioenez, betearen edo osoaren konnotazioa: *ordu bat = ordubete = ordu osoa*. Horregatik, ezin da *orduerdi bete, ordu laurden bete* esan, *orduerdi bat, ordu laurden bat* baizik; *erdi-laurden* eta *bete* kontradiktorioak direlako.

*Mende* hitzari ez dut uste *bete* gehigarria aplikatu zaionik, bai ordea, *gizaldi*-ri. Hau berez ez da mendea, giza-bizitza bat edo gizakiaren bizi-luzetasuna baizik, gero idazleek *mende* zentzuan erabili badute ere. Badirudi *mende* gizakiak *betetzeko* baino handiagoa dela, eta horregatik ez da *mendebete* esan. *Minutu* eta *segundo*-ri ere ez zaie *bete* erantsi, hitz horren konnotazioa aplikatzeko, denbora-frakzio txikiegiak direlako. Analogiaz, bai hauei eta bai *mende*-ri aplika dakiekeela? Ez dut ikusten zertarako hautsi behar den *bete* hitzak sortua duen filosofia. Bereiztasun bat kasu analogo guztietara zabaltzen bada, orduan ez da bereiztasun, arruntasun baizik.

DATORREN-JOAN DEN, HELDU DEN-IRAGAN: Gero eta mania handiagoa dago *pasa den urtean, pasa den asteburuan* eta abar idazteko.





Kastellanismo hori *–la semana pasada, el año pasado–* oker ala zuzen dagoen eztabaidan ez naiz hasiko, baina *etorri-joan* aditzen arteko simetria garbia hausteko motiborik ez dut inondik ikusten. Berdin *heldu den-iragan* ere: *heldu den urtean-iragan urtean*. Esamoldeak zerbaitegatik eta zerbaiterako finkatzen dira modu batera, kasu honetan, binomio gisan. Gaztelaniaz *la semana que se ha ido* ('joan den astean') esaten hasten bazara, barre egingo dizute. Egia da *datorren-heldu den* sinonimo hertsiak direla adiera batean, *iragan-pasatu* ere badiren bezala. Hala ere, *datorren-iragan* bikoa nekez entzungo duzu aho berean. Beharbada, *heldu den-joan den?* Ez nago ziur, baina baietz esango nuke. Nolanahi ere, nahasmenaren menpeko hiztunengan ez bada, esamolde horiek finkoak izan ohi dira. Sinonimo hertsiak izanik ere, ez dira trukatzen, edo ez lirateke trukatu behar. Gaztelaniaz nola hartuko genuke *la semana transcurrida* entzutea?

Behin baino gehiagotan entzun dut *datorren* eta *hurrengo* erratzen ere: *datorren astean* ordez, *hurrengo astean*. Ba, ez. Datorren astea datorrena da, eta hurrengoa datorrenaren ondorengoa, edo hemendik zazpi asteren ondoren datorrena. Gaztelaniaz ez dakit *la semana que viene* ordez *la semana siguiente* esaterik badagoen, baina hor ere *la semana siguiente* eta *la semana próxima* ez dira berdinak. Euskaraz, gauza bat da *datorren astea* eta beste bat *hurrengo astea, joan den astea* eta *aurreko astea* ere ezberdinak diren legez.

EDOZEIN MODUTAN, MODUREN BATEAN: *Edozein modutan* (de cualquier modo), *era guztietara* (de todos modos), *moduren batean* (de algún modo), *guztiarekin ere* (con todo), eta horrelakoak premia gabeko kastellanismoak dira, gehienean. Euskarak baditu *nolanahi, edonola, edozelan... nolabait, zelanbait, nola-hala, zelan-halan... hala ere, hala eta guzti ere, alabaina, ostera, ordea...*, horrelako esapideak sobera adierazteko. Batzuk, gehienean, *'ere'* erantsita: *nolanahi ere, nolabait ere*. Izan ere, gauza ezberdinak dira *nolanahi, edozelan*, hutsean ("honek gauzak nolanahi/edozelan egiten ditu") eta *nolanahi ere, edozelan be*. Hauek aurreko esaldiari erreferentzia egiten dioten esapideak dira.

BEZAIN PRONTO: Esatari askori ahoa betetzen zaie *saioa bukatu bezain pronto, lanean hasi bezain pronto* eta horrelakoekin. Ez da 'pronto' hitzagatik, nahiz eta *laster, azkar, bertan...* eta hainbat hitz dotore eta

geure edukirik, mailegu hori gehiegi maite ez dudan. Egituragatik da, kastellanismo literala delako. "Tan pronto como". Eta arrakasta ere, seguruenik, horrixe dagokio. *Hasi bezain laster* ere, egituraz, kastellanismo garbia da. Gaizki al dago? Ez, noski, hau ez baita inkisizioa, baina egitura sistematiko horrek beste egitura hobeak eta geureagoak ezabatzeko bidea darama. Bi aipatuko ditut lehenik: *lanean hasiz/hasteaz batera, lanean hasten deneko*. Bigarren formari bakoitzean dagokion denbora eta subjektua jarri behar zaio, jakina: *hasten deneko, hasi deneko, hasi zireneko, heldu gineneko*... Xalbadorrek honela hasi zuen bertso bat:

*Haurtxo txikiak sortu deneko*
*heltzen dio nigarrari.*

Beste egitura erabilita, *haurtxo txikiak sortuz/sortzeaz batera heltzen dio nigarrari* litzateke. Partikula bat ere bada, *baikoz*, esanahi bera daukana: *lanean hasi baikoz, saioa bukatu baikoz*. Hiru hauek, *sortu deneko, sortuz/sortzeaz batera, sortu baikoz* (badaude beste esapide batzuk ere) *sortu bezain pronto* baino hobeak dira, bai bizian, bai laburrean. Gustu kontua ere izan daiteke, noski, baina, honetan zein aurrekoetan eta ondorengoetan, batere premiarik gabeko esapide arrotzak mailegatzea ez dut uste euskararen kalitatea hobetzeko bide sanoa denik.

JOLASTU-JOKATU: Gaztelaniaz biak *jugar* badira ere, euskaraz gauza ezberdinak dira *jolastu-jostatu-olgadu* eta *jokatu*. Non dago aldea? Batetik besterako muga ez da beti zehatzegia, baina, oro har, jolasean ez dago galtzaile- irabazlerik. Jokatzea, ordea, galtzea ala irabaztea dakarren kirolean aritzea da. Jarrera subjektiboa jolaskorra edo ez-leihakorra izateak ez dauka zerikusirik. Futbolean, pilotan, musean... batak edo batzuek irabazten dute, eta besteak edo besteek galtzen, arau batzuen arabera. Horrela ez balitz, ez luke graziarik. Hitz-joko gisan, esan daiteke: *horiek, jokatzen barik, jolasten ari dira. Jolas* eta *joko* izenek ere bereiztasun bera daukate. Jolasak ez dira emaitza baterantz arauturiko jardunak, nahiz eta horiek ere nolabait arautu behar diren, eboluzio bat ukan dezaten. Nolabaiteko norgehiago bat izan daiteke, baina, azkenean, ez dago emaitzarik edo sailkapenik. Zer egin dute? Jolastu, soilik. Haurrek gehienean egiten dutena. Kiroletan, emaitza bat edo sailkapen bat dago, nahiz eta doan eta ondo pasatze hutserako jokatu. Haurrei eskolako gelan





irakasten zaizkienak, normalean, ez dira *jokoak* izaten, *jolasak* baizik. *Gaur zer egin duzue eskolan?* galderari *andereñok joko berri bat irakatsi digu* erantzuten duen haurrak hitza erratu du, eta hala egin du, andereñoak edo irakasleak oker irakatsi diolako. Batzuetan, muga zalantzazkoa izan badaiteke ere, telebistaz ematen dituzten kiroletan, argi dago ez direla *jolasten* ari, *jokatzen* baizik. *Jokalariak* dira, ez jostariak edo *jolastunak*.

GUREAN, ZUENEAN: Posesibo hauek, bakarrean eta errepikapen bat ezkutatzen ez dutenean, *gure etxean, zuen etxean* esan nahi dute, eta esamoldeok beti 'etxe' hitzari loturik doaz, ez beste ezeri. Eta kasu hauetan bakarrik: *gurean, guretik, gurera* eta honen jarraipenak diren *gurerantz, gureraino, gurerako*... Beste kasuetan, *gure etxea, gure etxearen, gure etxeko, gure etxeari, gure etxearentzat*... esan behar da. Berdin *zuen* posesiboarekin ere.

Egitura hau 'etxe' kontzeptuari dagokio, familia baten etxebizitzari eta hango bizi-inguruari, eta bizkaieraren ezaugarria izan da. Beraz, bizileku fisikoa eta honi datxekon familitasuna. *Etxe*, analogiaz, beste egoitza batzuei ere aplikatzen zaie orain, telebistari, adibidez. *Gure etxe honetan = gure telebista honetan*. Baina kontzeptu asimilatu hauei ezin zaie *gurean, zuenean* esamoldea aplikatu, jatorrago delakoan, *gure etxean, zuen etxean* esateko. Hori *etxe* bizileku familiarraren esklusiboa da. Analogiaz, edozein etxe kontzepturi aplika dakiokeela? Orduan, bereizkuntza bat ezabatzen eta bere azpiko filosofia bat izorratu dugu.

Berdin nor-izen arrunten nahiz berezien genitiboan ere: *gurasoenean, amamarenera, Tomasenetik*... Hauek beti haien etxebizitza edo bizileku dira, ez haien lantegi, bulego eta abar. *Denda, taberna* eta horrelako banaka batzuei ere aplikatu izan zaie, hauek etxebizitzarekin unitate bat osatzen zutelako. Gero, esamoldeak jarrai dezake, nahiz eta dendariak edo tabernariak han ez bizi. Hobeto esanda, han ez lo egin, zeren, egun osoa han ematen badute, han bizi direla esan daiteke. Beraz, esan daiteke: *Tomasa(re)nean hasi, Pijonenean segi eta Josepa(re)nean mozkortu ginen.* Hauek neuk ezaguturiko taberna batzuen izenak dira.

Esan beharrik ez dago *gure, zuen* eta beste posesibo guztiak bakarrean erabil daitezkeela, errepika bat ordezten dutenean, dela *etxe* nahiz beste

edozein hitz izan. *Zuen asmoan ez dakit, baina gurean (gure asmoan) ez dago horrelakorik.* Hau beste kontu bat da, errepikapen bat saihesteko baliabide arrunt bat.

BEHAR MODUAN: *Behar bezala* eta *behar den moduan* sinonimoak izateak zenbait esatari *behar moduan, behar moduko, hori moduko* eta gisakoak esatera darama. *Behar den moduan* esamolde adberbiala da. Beraz, *behar den moduan, behar den modura, behar den moduko* esan behar da, *behar den unean, behar den lekutik, behar den guztian* bezala. Eta *horren moduko, gure moduko, amaren moduko,* aurreko hitza genitiboan dela. *Bezala* bera bietara erabil daiteke, *behar bezala* nahiz *behar den bezala.*

BEHARBADA, BEHAR BALDIN BADA: Behin baino gehiagotan *behar baldin bada* entzuten da, *beharbada, agian*-en sinonimotzat. Gaizki. *Beharbada,* adberbio gisa hitz bakarra denean, *beharbada* da beti, gaztelaniazko *quizás, tal vez* esanahian. Gaztelaniazko *si hace falta, si se necesita* esan nahi duenean, *behar bada* edo *behar baldin bada* izan daiteke.

JAN ETA GUZTIA - JAN ETA DENA, JANARI ETA GUZTI: *Etxe honetan jan eta guzti egiten da* gaizki esanda dago. *Jan eta guztia* edo *jan eta dena* esan behar da, horren esklusioa *jan ez beste guztia* edo *jan ez beste dena* litzatekeen bezala. Beste gauza bat da *'eta guzti'* esamolde adberbiala. Hau izenekin bakarrik erabil daiteke, *zerekin* esan nahi baitu: *janari eta guzti, kotxe eta guzti...* Gaztelaniaz, *con comida y todo, con coche y todo.* Kasu honetan, *guzti* eta *dena* ez dira trukagarri. Ezin da *gorbata eta dena etorri da* esan, *gorbata eta guzti* baizik. Hau esamolde egin bat da.

Beraz, *mozkortu eta dena egin genuen, gure etxean ligatu eta guztia egiten da,* eta abar esan behar da, *guztia* baino *dena* erabiltzea naturalago delarik. *Lo eta dena egiten da hemen. Mozkortu eta dena egin ginen. Lo eta dena egin genuen bertan.* Egitura honek, adjektiboekin ere erabiltzekotan, honela beharko luke: *Polita eta dena zara gero! Gizon hori nazkagarria eta dena da.*

OTE: *Ez dakit ondo amaituko ote den* eta antzekoak gero eta gehiago entzuten dira. OTE partikula sobera dago hor. Eta askoz soberago, perpausean galdekariren bat dagoenean: *ez dakit nola amaituko ote duen,*





*galdeiozu noiz etorriko ote den.* Horrelakoetan, OTE partikula belarrondoko bat da. Zehar-galderak, gehienik ere, *ea-ia* partikula onar dezake: *galdeiozu ea noiz etorriko den. Jakin* aditzak horixe ere ez. *Ez dakit ea etorriko den* oso gaizki legoke. Egitura hauek eta *ote*-ren zentzu osoa, zenbait burutan, loka daudela dirudi. Ez daude oso seguru, eta partikula lagungarriak sartzen dituzte, entzuleen belarrietara okerra zabalduz.

BERA: Izenordain intentsibo honen bi esanahiak geroz gutxiago bereizten dira. Gauza bat da *gizon berak,* eta beste bat, *gizonak berak.* Gehienean tokatzen den bigarren honi lehen forma aplikatzen zaio, oker. Lehen forman, izenordaina bakarrik deklinatzen da, erakusle bat bailitzan, eta identitatea adierazten du. *Atzoko gizon bera al da hori? Bai, bera da.* Horrek esan nahi du atzo ikusi genuen gizon hura bera dela orain dakusgun hori. Izan liteke berdina, bikia adibidez, baina ez bera. *Neure auto berdin-berdina daukazu* –jaurti diozu, ostua ote dizun zirikatuz, eta berak: *–Berdina, baina ez bera, eh*!

Euskalki batzuetan, BER aurretik jartzeko modua dago: *ber gizona, ber fedeak, ber gisan = gizon bera, fede berak, gisa berean.* Baliabide laburra eta dotorea da. Bide batez, BER honek aditz jokatuekin daukan eginkizun bat aipatuko dut, aieru edo suposamen esanahian. Azkuek bere hiztegian hiru adibideok dakartza: *ona den ber, on den ber, ona izan dadien ber*: ona dela emanik, ona izango dela suposaturik. Esamolde honen kontzisio hain originalak euskara osora berehalaxe zabaltzea merezi du.

Bigarren forma (*gizonak* berak) intentsiboa da, eta biak deklinatu behar dira. *Haurrak berak adierazten du noiz den gose. Daukadan gosearekin idia bera jango nuke. Daukadan amorruarekin, harriari berari kosk egingo nioke.* Non, nongo, nondik, nora kasuetan, intentsiboa BER-en adberbioz egiten da. *Plazan bertan bizi naiz. Herriko bertako giroa. Ifernutik bertatik baletor legez. Etxe aldera ez ezik, etxera bertara.* Eta ez, oraintxe bertan Euskadi Irratiko bi esatariri jarraian entzun diedanez, *etxe bertan, Kolonbia bertatik,* eta abar.

HARTZA BAT, PLATERARIK: Haur ipuinetan, kantetan, esatariengan... euskal hitza zein den ez bereizteko kasuak ez dira gutxi. Hitza *hartz, plater, zotz...* bada, *hartz bat, platerik, zotzean* behar du, eta

ez *hartzarik, plateran, zotza bat*, eta horrelakoak. Beste kontu bat da A erantsia ala ez, bietara posible izatea (*txapel-zapela, paret-pareta*); edo erantsia duen hitzari hura jateko tradizioak egotea: *gauza-gauz, lotsa-lotsik*, eta hala. Daukanari kentzeko lizentziak badaude, baina ez daukanari eransteko, inoiz ere ez.

NAHIKO OGIA JANDA: Honelakoak ere gero eta zabalago entzuten dira. Euskaldun askoren hizkeran, aspalditik datorren okerra da hau, baina *nahiko-nahikoa* eta *aski* ere, *zenbat, anitz, asko, gutxi, gehiago, gutxiago* bezala, kantitatea adierazten duten zenbatzaileen sail berekoak dira. Izena aurretik ala atzetik joateak ez du deklinabiderik aldatzen. Beraz, *nahiko ogi janda, nahikoa diru, aski indar, aski lan, badaukagu nahiko lan*, eta abar behar du, *zenbat lan, anitz diru, kontu gutxi* bezala. Eta berdin *nahi adina ogi, behar hainbat lan, nahi beste dolar, behar bezanbat kemen*... Sarritan, gainera, 'nahiko ogia janda' esan duenak, gero, berdin esango dizu: *badiagu nahiko lan.*

ZERTAN ARDURATU BEHARRIK: Bizkaieratik datorren esamolde honekin eta *behar*-ekin geroz gehiago entzuten da: *ez daukazu zertan arduratu beharrik, ez dago zertan esan beharrik*, eta abar. Hori baino gauza sinpleagoa da. Bi esamolde sinonimo daude: *ez daukazu zertan arduratu (zertan arduraturik)* = ez daukazu arduratu beharrik. Esaldi berean 'zertan' eta 'beharrik', kontzeptu bera errepikatzea da. Mestizaje arraro hori gaztelaniaz 'no tienes necesidad de por qué preocuparte' esatea bezala da. Eta, bide batez, zergatik ari da *preokupatu* aditza nagusitzen, euskarak hain ordain argiak edukirik? Ez dut ikusten *preocuparse, preocupación, preocupado, preocupante, preocupadamente* familia euskarara mailegatzeko motiborik.

INDIOARENA EGIN: Esamolde hau, kasu bakan batzuetan, zuzen legoke. Esaterako, antzerki bateko pertsonaien banaketan galde daiteke: *nork egingo du indioarena*? Alegia, indioaren papera, bat eta jakina. Gehienean, ordea, *hacer el indio, hacer el tonto, hacer el payaso* bezalakoek indioen, tontoen edo pailazoen gauzak egitea esan nahi du. Euskaraz *indioenak, tontoenak, pailazoenak... egin*. Beraz, *indioak* pluralean eta honen posesiboa ere bai. Ez da indio konkret bat, 'indioak' orokorrean baizik. Eta esamolde sinonimo, agian, euskaldunago bat nahi izanez





gero, *indiokeriak, tontokeriak, pailazokeriak... egin* edo *indiokerietan, tontokerietan, pailazokerietan... ari, ibili, jardun.*

Beste kontu bat da *hacerse el indio, hacerse el loco*, hots, indioa dela, zoroa dela simulatu. Horretarako aurkitzen dudan esamolderik motzena eta adierazkorrena *buru*-rekin da: *indio-buru, zoro-buru, jakintsu-buru, gizajo-buru... egin*. Esaldi luzeago baten laburpen dotorea da hau: *norbere burua zoro egin = zoro-buru egin*. Aditzekin badaude *ez-entzun, ez-ikusi, ez-ohartu egin... = Hacerse el sordo, el ciego, el despistado*. Bizkaieraz, behintzat, oso normalak izan dira, eta dira.

GAUR, GAURKOAN: *Gaur, atzo, bihar, aurten, ihaz*... ordez, *gaurkoan, atzokoan, biharkoan, aurtengoan, ihazkoan*... esateko mania zabaltzen ari da, ahoa gehiago betetzen dutelako edo. Gauza bat da *gaur*, eta beste bat *gaurkoan, gaurkotik, gaurkoari, gaurkorako... Atzoko partidan ederki jokatu zuten, baina gaurkoan nekea igarri zaie*. Honelakoetan, *gaurKOAN* horrek 'partida' hitzaren errepika aurrezten du, eta horixe da bere egitekoa, baina, bestela, *gaur, atzo, bihar* soilik esan behar denean, beste forma hanpatu horiek borobiltasun antzua besterik ez dakarte. Eta kontzeptuen nahastea.

ERE: Partikula hau sekula gehiago ondo erabiliko den itxaropena galduta nago. Ia ez dago esataririk ez pertsonaia publikorik, zuzen erabiltzeko gauza denik. *Zuzen* esatean, erlatiboki diot. Badakit Iparraldean aspalditik direla horretan libreagoak, baina Hegoaldeko tradizioaren arabera hitz egiten bazaie, ez zaie belarririk minduko.

*Ere* partikularen aplikaerak, izan ere, gaztelaniazko *también* adberbioaren antz txikia dauka. Gaztelaniaz nahiko libreki sar daiteke. Euskaraz, ordea, dagokion hitzaren atze-atzean joan behar du. Adibidez: *Ayer tambien se pescó anchoa en la última salida al mar*. Zein hitzi dagokio 'también' hori? Esaldi ezberdinak baitira: *atzo ere antxoa arrantzatu zuten azken itsasaldian*. Edo: *atzo antxoa ere arrantzatu zuten azken itsasaldian*. Edo: *atzo azken itsasaldian ere antxoa arrantzatu zuten.*

Gaztelaniaz (hortik dator nahasmena), hiru ñabardurok nola bereizten diren azaltzea ez dagokit neuri. Dakidana da, euskaraz, gero eta lorrin handiagoa dabilela. Oraintsu arte edozein euskaldunek, eta gaur ere askok

batere kosta gabe bereizten dituen esaldi hauek eta beste batzuk, zergatik ezin dituzte zuzen asmatu esatari eta euskararen irakasle askok eta aditu ez gutxik, idazleak tartean direla? Euskarazko metodoetan ere ikusi izan ditut ariketak oker aplikatuak. Hortik atera kontua ikasleek zer ikasiko duten.

Zer egin, berari dagokion hitzaren atzetik beste toki batera aldatzen badugu? Orduan, aurretik *baita* behar du. Gaizki: *esan behar da ere bihar hasten dela...* Gaizkiago: *ere esan behar da bihar hasten dela...* Ondo: *baita ere esan behar da bihar hasten dela...* Edo: *esan behar da, baita ere, bihar hasten dela... Baita ere* horretan, *ere* ezabatu eta *baita* bakarrik uztea ondo legoke. Beraz, ondo: *baita esan behar da bihar hasten dela...* Edo: *esan behar da, baita, bihar hasten dela...* Galde-erantzunetan, batzuetan, partikula bakarrik gera daiteke, beste elementua edo elementuak ezabaturik. Gaztelaniaz adibidez: *¿Quieres café? – Sí – ¿Y azúcar? – También.* Euskaraz zer tokatzen da *también* horren tokian? Inola ere ez 'ere' bakarrik, edo 'ere bai', baizik 'baita ere' edo 'baita'. *Ere bai* zuzen egoteko, dagokion hitz eta guzti joan behar du: *hori ere bai, ama ere bai, azukrea ere bai.* Hitz hori jaten bada, *baita ere* edo *baita* izan behar du. Beraz: *Kaferik nahi al dun? – Bai – Eta azukrerik? – Baita (ere).* Ezezkoan ere antzera: *Ez dut kaferik nahi – Eta urik? – Ezta (ere).*

Hau ez da azalpen exhaustibo bat emateko tokia, eta ez dakit asmatuko nukeen ere, baina hona arau bat, kasu guztiak edo gehienak hartzen dituela esango nukeena: *ERE partikula, bere hitzaren atzetik beti. Hortik kanpora, BAITA ERE edo BAITA soilik.* Ez dirudi arau zaila, baina alferrekoa, seguruenik.

USTEN: Zenbait mania borobilkoiren artean, hau ere gero eta aurrerago doa: *Usten dut, usten dugu, zer usten duzu,* eta abar. Ba, ez! Hitza *uste* da (ustea, usteko, ustedun...) eta aditza *uste izan-ukan.* Beraz, *uste dut, uste det, uste dot.*

HORIXE BAIETZ, NOSKI BAIETZ: Kastellanismo lotsagabe hauei ezingo diegu gailentzen utzi, ezta? Ez, noski! Ez horixe! Are gutxiago, *'jakina baietz'. Jakina* bera da, hutsean, gaztelaniazko *claro que sí.* Eta, bestela, hor daude *bai horixe, bai noski, bai alajaina,* eta hainbat antzeko.





Ordena gaztelaniaren alderantzizkoa da. *Claro que sí = bai noski; bai horixe. Claro que no = ez, noski; ez horixe.* Ohar hauek iritsiko ahal dira noskibaieztarren belarrira!

HOBE-HOBETO: Gaztelaniaz biak 'mejor' direla-eta, hauek ere aho askotan nahasten hasiak dira. Gauza bat da *hobe izan*: hobe da, hobe zenuke, hobe litzateke... eta beste bat, *hobeki egon, hobeto esan, hobeto bizi...* Bata adjekiboa da, bestea adberbioa. Beraz, *hobe esan, hobe esanda,* edo *hobeto da, hobeto litzateke,* eta gisakoak akats larriak dira, adjekiboa eta adberbioa alderantziz aplikatzen baitira.

NAGUSI: Hitz honen esanahietako bat 'printzipal' da, eta orduan ez du superlatiborik behar. Beraz, *hor dago koska nagusia, oraingo arazo nagusiak,* eta ez *hor dago koska nagusiena, oraingo arazo nagusienak.* Gaizki al daude? Ez dakit, baina gaztelaniaz *aquí está la cuestión más principal, tu problema más principal, los artistas más principales,* eta gisakoak entzunez gero, barre egiten dizute.

BADAKIT, JAKIN DAKIT, JAKIN BADAKIT: Hiru esamoldeok txarto bereizten dira sarritan.

*Badakit.* Hauxe da formarik ohikoena, baieztapen sinplea. Aditzak baiezkoak ala ezezkoak dira. Aditz trinko bategaz ezin da esaldirik hasi, BA edo BAI hori barik. Ezin da *noa etxera, dakit nor zaren, nator, daukat,* eta abar esanez hasi. *Etxera noa* bai, baina *banoa etxera.* Bada salbuespen bat, 'nago' forman, batez ere: *nago ez dela ezer gertatuko. Nago ez duzula ezer ulertu.* Esamolde horiek 'susmoa daukat', 'pentsatzen ari naiz' esan nahi dute. Laguntzailedun aditzak, ezezkoak ez badira, baiezkoak dira denak*: entzun dut, jakin nuen, esan didate, jango nuke.* Baieztapena indartu gura bada, badaude moduak*: badakit, bai, nor zaren; badakit, noski; ondotxo dakizu hori horrela ez dena; sobra ere entzun dut zer esan duzun,* eta abar. Berdin ezezkoan. *Ez dakigu, ez; ez dakigu, noski,* eta abar.

*Jakin dakit.* Aditza galdegaia denean, hau da, zeozergatik aditzaren beraren esanahia indartu gura denean, EGIN aditza sartzen da: *jan ez ezik, irentsi EGIN du. Jo EGIN nau. Hori jaten baduzu, hil EGINGO zara.* Aditz trinkoetan, galdegaiaren efektua aditza bera errepikatuz lortzen da,

bizkaieraz bederen: *Leloa zelakoan, horrek JAKIN daki. Hartu eta EROAN daroa, gainera, lotsabakoak! Aulkian geratzekoa zena, egun batetik bestera, IBILI dabil. Denbora JOAN doa, erremedio gabe.* Joko hau (aditza bera indartzea) baiezko esaldietan bakarrik gertatzen. Ezezkoetan, definizioz, ezetza bera da galdegaia, eta aditza indartzeak ez dauka zentzurik.

*Jakin, badakit.* Hau, zuzen erabiliz gero, hain maiz gertatzen ez den esamoldea da, oso nabarmena bera. Horrela doan aditzak beste aditz batekiko kontraposizioa adierazten dau. Horregatik, bigarrena, gehienean, adbersatiboa da. *Jakin badakigu, baina ezin dugu esan. Ibili banabil, baina ez ondoegi oraindik. Dirua ere, eduki, badaukat, baina zorrak gehiago. Entzun, entzun nuen, baina ez nuen sinetsi. Izan, bada, baina disimulatu egiten du.* Izan aditzagaz, ekibokoa ekiditearren, beharbada, beste forma hau sortu da: *izatez, bada, baina disimulatu egiten du....* Eta berdin beste guztiekin: *edukitzez, badaukat; jakitez, badakit...* Aditz perifrastikoekin, joko bera: *etorri, etortzen da, baina inork ez du ikusten. Ikusi, ikusi nuen, baina ez nuen ezagutu. Jan, jaten dut, baina erdi derrigorrean. Joan, joango nintzateke, baina gero zelan etorri?* Edo: *jatez, jaten dot, baina erdi derrigorrean; joatez, joango nintzateke, baina...* Esamolde hau ezezkoetan ere berdin gerta liteke, baina beti ere bi aditzen kontraposizioa markatuz. *Jakin, ez dakit, baina susmatzen dut. Piztu, ez gara piztuko, baina izango gara zerbait. Gizendu, ez naiz gizendu, baina puztu bai.* Aditzaren errepika EGIN aditzarekin saihestea ere normala da. *Gizendu, ez naiz egin, baina moteldu bai. Lokartu, egin nintzen, baina bai berehala itzartu ere.*

Esamolde hau gaztelaniara literalki pasatu da: *Saber ya sabemos, pero no hacemos caso. Comer ya come, pero no se le nota. Trabajar ya trabajamos, pero ganar poco. Andar ya ando, pero no adelgazo.* Ezezkoan ere berdin. *Tener, no tenemos, pero aparentar, como el que más. Estar, no estaremos, pero como si estuviéramos.* Baiezkoan nahiz ezezkoan, beti 'pero' bat ondoren. Gaztelaniatik ikasi behar ote dugu orain, euskaraz ondo erabiltzen asmatzeko?

Azalduriko hiru esamoldeotan (*badakit, jakin dakit, jakin badakit*), normalena, ia betikoa, lehenengoa da: baieztapena. Bigarrena ere (aditza galdegai dena) nahiko sarri gertatzen da. Hirugarren esamoldea nahiko puntuala da, eta oso garbi identifikatu beharrekoa. Tokatzen denean,





elegantea da, baina, behar ez den lekuan, ezjakintasun ausarta salatzen du. *Jakin badakigu... baina ez dizuegu esango,* edo gisako zerbait suposatu behar da. Berri bat ematen hasteko era bikaina!

BERANDUAGO–GEROAGO: Berandu = ordu jakin bati buruzko atzerapena. Oso txarto: *orduerdi beranduago etorri zen bigarren gola. Lehenik oinez ikasten da, eta beranduago berbetan. Urtebete beranduago, bigarren mundu-gerra hasi zen.* Noiztik dago golak sartzeko, edo berbetan ikasteko, edo gerrak hasteko ordu jakinik? Bai izan liteke: *Haur honek berandu ikasi zuen hizketan.* Orduan esan nahi da atzerapenez, normala den ordu edo denboratik atzerago ikasi zuela. Ondo: *orduerdi geroago etorri zen bigarren gola. Lehenik oinez ikasten da, eta gero (geroago) berbetan. Urtebete geroago, bigarren mundu-gerra hasi zen.* Gaztelaniazko "más tarde", sarritan, geroago izaten da euskaraz. 'Tarde o temprano', 'más tarde o más temprano" ez da ordu bati buruz. Ez da *goiz edo berandu, arinago edo beranduago, goizago edo beranduago,* baizik *lehenago edo geroago; lehentxoago-gerotxoago.* Gaztelaniaz ere bada, zuzenago agian, 'antes o después'. Ba, 'tarde o temprano', gehienean, horixe izaten da.

EDOTA, BAIZIK ETA: Zenbait partikulari ETA gehitzeko beste mania sistematiko bat zabaltzen ari da: *edota, edo eta, baldin eta, baizik eta, baina eta, zeren eta, non eta, noiz eta...* Martxa honetan, laster dena izango da ETA gehi zeozer aurretik: *ordea eta, bezain eta, agian eta, lehenik eta, azkenik eta, ondoren eta, jakinik eta, ikusirik eta...* Egia da 'zeren eta', 'nahiz eta' eta gisako batzuk erabilera luzean finkatuak direla, baina, horietan ere, alferreko ETA hori jan arren, ez da ezer galtzen, laburtasuna irabazten baizik. *Nahiz eta ezer ez dakidan = nahiz ezer ez dakidan. Nahiz eta dena galdu, ez naiz erretiratuko = nahiz dena galdu. Zeren eta inork ez baitzuen aurreikusi = zeren inork ez baitzuen aurreikusi...* Aurrerapena alferreko elementuak gutxitzea zelakoan, alderantzizko manian gabiltza. Edo, edota, edo eta gauza bera izatetik ez dugu ezer irabazten, gero, *edo/eta* binomioa benetan aukeran utzi nahi denerako, dena nahasita edukitzea besterik.

Atal hau amaitzeko, gehiegi saiatu gabe gogoratu zaizkidan zuzenkizun batzuk zerrendatu ditut hemen. Ez dira euskaldun berriek egiten dituztenak, edo irrati- telebistetara gonbidatu legez deituak izan

direnek. Hauek, bistan denez, dakitena eta ahal dutena egiten dute, eta ez daukate zuzen hitz egiteko obligaziorik, egingo balute hobe baina. Aipatu ditudan adibide guztiak esatariei, aurkezleei, kazetariei, idazleei, euskararen irakasleei entzunak edo irakurriak dira. Euren lanagatik, euskararen langile kualifikatuak direnei. Ez daiteke jasan horrelako okerrak (eta zenbat gehiago!) egunero normal ibiltzerik, hainbeste entzule edo irakurle daukaten liburu eta medioetan. Era antolatu bat behar da, euskara profesionala, behintzat, zuzenago ibil dadin. Nola? Ez da nahitaez bulego bat behar. Zenbat eta 'zuzentzainen' sarea zabalago eta Euskal Herri osoaren ordezkariago izan, lan hobea egingo da. Lan sistematikoa, koordinazio baten barruan. Antolakuntza baten kontua da dena. Eta, lehen-lehenik, kontzientzia batena. Komunikabide zein erakunde batek bere barne kontrola ezartzeko ardurarik ez badu, inork ez dio konturik hartuko. Nork eta nola aton dezake hizkuntz kalitatearen Zuzentzaindia? Ez dut alferrik pentsatzen hasi nahi, baina bistan da premia galanta dagoela.





# SORTZAINDIA

Aipatu Zuzentzaindiaren lana murritza eta gaizki ikusia litzateke, okerrak zuzentzeko zeregin inkisitiboa besterik ez baleuka. Batez ere, argibideak eta soluzioak emateko balio behar du. Horretarako, sarritan, sortu egin behar du, hitz eta esapide berrietan, jargoi hizkeran, eta maila guztietan. Oro har, antolakuntza horrek hiru lan modu burutuko lituzke: aholkatu, soluzionatu eta sortu. Batzuetan, kontsultak iritsiko zaizkio, iritzia eskatuz. Beste batzuetan, soluzio konkretuak eskatuko dizkiote, eta bere kabuz emango ditu. Eta, azkenik, inork eskatu gabe, zenbait emaitza sortu eta proposatuko ditu.

Zerbait oker dagoela esateak gutxi balio du, era zuzena eta konbintzentea ematen ez bada. Sarritan, okerraz jabetzen gara, baina *zeuk nola esango zenuke?* galdetzen digutenean, albo egiten dugu: *Ez, hori horrela zuzen ee... euskarak beste era bat dauka... ez da derrigorra erdararen ildotik... – Baina nola zehazki? – Beno, horrela bat-batean...* Ez dakigula aitortzeko baino jakintsuago uste garenean, hizkuntzen filosofiei eta erudizio marginalei heltzen diegu.

Telebistako programa oso entzuletsu batean, honelakoak entzun ditut: *Aber, hi! Jode! Hau duk... osea... eske la hostia duk. Hombre! Neu kanpora?... Enfin... bueno, bale! Joango nauk, baina porkulo har zak.* Euskara freskoaren eredua. Hizkera kolokiala horren kolonizaturik daukan hizkuntza bat has zaitez gero indoeuropar edo ez dakit zer delako harrotzen. Horrelakoetan, ikaragarrizko lotsa eta beldurra sartzen zait, euskararen detraktoreren bat entzuten ariko ote den. Eta ez uste erdal klitxe nabarmen hauek "euskañolen" esklusiboak direnik. *Aber, osea, eske, enfin, bueno, bale, hombre, klaro, portzierto...* eta solas-hizkeran etengabe sartzen den beste horrelako hainbat kalaka 'fresko', idazle eta jakitun itzaltsuen ahoan eta luman ere badira. Ez, agian, denak sailean, dosifikaturik baizik, baina, azkenean, denak.

– *Heuk nola esango huke, ba?*
– *Harrapatu nauzue, neuk ere esaten baititut horrelakoak.*

Auzia ez da, berriz ere, indibiduala, kolektiboa baizik. Erregistro kolokialetan hainbat esamolde dira, etengabe errepikatzen direlako, hizkuntzari kolore osoa damaiotenak. Euskaraz larri ibiltzen gara, arlo hori erkin daukagulako. Entregatu egingo al gara erdararen esku? Nork sortu edo sortzen lagundu behar du eguneroko hizkera ezin garrantzitsuago hori?

Orain, goragoko euskara 'fresko' hori beste euskara fresko batera itzultzen saiatuko naiz: "*Erne, hi! Alua! Hau duk... alegia... hau hostikeria baita. To! Neu kanpora?... Tirok, ba!... ongi, eginda! Joango nauk, baina popatik har ezak*". Arazo nagusia da askok forma hauei ez diela aurrekoen indar espresiborik aurkitzen. Grazia edukitzeko, erdaratik datozen esapideak izan behar dute. Orduan, hitzena edo hitzen ordainena baino sakonagoa da arazoa. Patologia kultural bat, esan genezake.

Horiek eta beste esapide asko eta asko behar dira. Kontua ez da hainbeste hitz bakoitzaren ordain literala, hizkuntza bakoitzak hain bere erara garatzen duen eremu kolokial osoa baizik. Eta hori hizkuntzaren premiarik urgenteenetakoa da, egunero etengabe begitik eta belarritik sartzen ari baita. Zientzia-hizkuntzak, esaterako, itxaron dezake. Baita literatura-hizkuntzak ere. Badakit itzultzaileak, sarritan, buruak apurtzen ibiltzen direla, baina liburuetako hizkuntza ez da telebistakoa bezain ageria, direktoa eta masiboa.





Sortzeak arlo asko dauka. Lexikoa eta hitz bakoitzaren hainbat aplikaera hiztegian aurkitu behar dira. Baina badaude eguneroko mila esamolde, hiztegiak jaso ezin dituenak. Iragarkiak, bide-seinaleak, hainbat etxe eta lantegi motaren izenak, eta gero bertako barruko oharrak edo argigarriak... Har dezagun erdarazko adibide mordo bat:

*- Pase usted sin llamar, Bilbao le saluda, Bilbao le despide, entra usted en zona urbana, ceda el paso, empujar, tirar, usted no tiene preferencia, cambio de sentido, dirección prohibida, controle su velocidad, recuerde, entra usted en zona no nuclear, entra usted en zona militar, no se detenga, no cargue con motor en marcha, atención a las señales, aparcamiento limitado, recoja su ticket, vía manual, vía automática, usuarios sin moneda, atención al tren, entrada, salida, prohibido fumar, prohibido aparcar, prohibido verter residuos, curva peligrosa, pendiente prolongada, sea usted bienvenido, buen viaje, agradecemos su visita, esperamos que vuelva, area de descanso, cuidamos su perro, estamos a su servicio, hablamos inglés, espere hasta que le llamen, prohibido pintar bajo multa, no respondemos de su vehículo, tramo en obras, respete las señales, velocidad controlada por radar, zona peatonal...*

Honelakoetan eta beste milatan, bi aukera daude: itzuli ala sortu. Itzultzea gaizki al legoke? Ondo itzuliz gero, barka liteke. Zer da hobea? Sortzea, noski; hizkuntza bakoitzak bere barrutik ateratzea. Hizkuntza garatuek ez al dute horixe egiten? Horrelako esaldiak hizkuntza bakoitzak bere erara moldatzen ditu. Kointzidentziak egongo dira, kontzeptuak eta mezuak ere sarritan bat baitatoz. Baina, gehienean, ez dira bata bestearen itzulpenak izango. Euskaraz, itzultzetik jotzen badugu, kastellanismoz, galizismoz, anglizismoz... josiko gara. Kastellanismoz batez ere, euskaldunik gehienok gaztelaniaren kolonian bizi baikara. Dagigun aproba bat. Lehenik, itzulpen on bat egiten saiatuko gara, honelatsu:

*-Pasa zaitez deitu gabe. Bilbok agurtzen zaitu. Bilbok adio egiten dizu. Hirigunean sartzen ari zara. Eman ezazu bidea/utz ezazu bidea. Bultzatu/ Sakatu. Tiratu. Zuk ez daukazu lehentasunik. Norabide aldaketa-itzulbidea. Norabide debekatua. Kontrolatu zeure abiadura. Gogora ezazu. Gune ez nuklearrean sartzen ari zara. Gune militarrean sartzen ari zara. Ez zaitez geratu. Ez kargatu, motorea abian dela. Begiratu seinaleei. Aparkamendu*

*mugatua. Har ezazu zeure tiketa. Eskuzko era. Era automatikoa. Moneta gabeko erabiltzaileak. Kontuz trenarekin. Sarrera. Irteera. Erretzea debekaturik. Aparkatzea debekaturik. Hondakinak botatzea debekaturik. Bihurgune arriskutsua. Aldapa luzea. Izan zaitez ongi etorria. Izan bidaia ona. Zure bisita eskertzen dugu. Itzuliko zarela itxaroten dugu. Atseden gunea. Zure txakurra zaintzen dugu. Zure zerbitzuan gaude. Ingelesez hitz egiten dugu. Itxaron ezazu deitu arte. Pintatzea isunpean debekaturik. Ez dugu zure ibilgailuaz erantzuten. Bideunea lanetan: Errespeta itzazu seinaleak. Radarrez kontrolaturiko abiadura. Oinezkoen ingurua...*

Gaizki al daude? Banan-banan ez dago hain gaizki daudela esaterik, baina multzoan harturik, kalko triste bat besterik ez dira. Eta, jakina, kalkoetan ere badaude tristeak eta tristeagoak. Hizkuntza bakoitzak (gure kasuan, gaztelaniak, frantsesak eta ingelesak) esapide hauek nola moldatzen dituzten begiratzea ondo dago, batak ez bada besteak ideia on bat eman baitezakete. Gutxienez, elkarren arteko diferentziez jabetuko gara, batarenak edo bestearenak kalkatzeko tentaziotik askatzeko. Baina gero, euskararen barrutik moldatzen saiatu behar da. Eta beti ere, maila horretako hizkuntzak eskatzen dituen hiru baldintzetan: zuzen, argi, labur. Alegia, esapide argiak eta laburrak behar dira. Aditz jokatua tartean denean, euskaraz badakigu zer koska datorren, gehienak aditz perifrastikoak baitira. Badauzkagu geure abantailak ere, baina, oro har, beste hiru hizkuntza horien aldean, laburtasunerako, desabantaila handian gaude. Horrexegatik saiatu behar dugu, arrazoi gehiagoz, barrutik sortzen, beste eredu bat kalkatzeak oso bide bihurrira eraman baikaitzake. Honelatsu, adibidez:

*- Sar dei gabe/Aurrera dei gabe. Bilbok agur. Bilbok adio. Hirigunean sartzen. Eman bidea/Utz aurrea. Bultz/Saka. Tira. Ez daukazu aurrerik/lehentasunik. Itzul. Norabide debekatua. Euts abiadurari. Gogoratu/Oroit. Gune ez nuklearrean sartzen. Gune militarrean sartzen. Ez geratu. Ez bete motorra abian/Ez bete motorra dabilela. Adi seinaleei/Begira seinaleak. Aparkaldi mugatua. Har tiketa. Eskuz. Automatikoa. Monetagabeak. Kontuz trenarekin. Sar. Irten. Ez erre. Ez aparka. Ez hondakinik. Bihurgune txarra. Aldasbehera luzea. Ongi etorri. Ongi joan. Bisita eskertzen dizugu-Milesker bisitagatik. Itzuliko ahal zara. Atseden/Geldilekua. Txakurra hemen. Zerbitzari gaituzu/Zuretzat gaituzu. Ingelesez badakigu. Itxaron deitu arte. Pintatzea isun. Ez gara ibilgailuen erantzule. Lanak: kasu seinaleei. Abiadura radarrez. Oinezgunea...*





Gaztelaniak –berdin beste erdarek– "*sin llamar*" jartzen dutelako, nahitaez '*deitu gabe*' jarri behar al dugu? Halaber, "*entrada, salida*" jartzen dutelako, geuk ere '*sarrera*', '*irteera*', nahitaez? Ez, noski. Norbaitek esan lezake '*sar*' eta '*irten*'-ek, horrela beste gabe, inperatiboak diruditela, '*sar dei gabe*'-n bezala. Izan litezke, baina ez nahitaez. '*Sar*' aditz baten erroa da, eta erro hori balioanitza da. Behin inperatiboa, behin hitz elkartuen elementua –sarbide, sartaldi–, behin subjuntiboa, behin... '*Sarrera*' gaizki al legoke? Ez diot gaizki dagoenik, nahitaezko ez dela eta hobeak izan daitezkeela baizik. Orduan, batek era batzuk, bestek beste batzuk asmatzen baditu, denen artean orotasun egokia osatuko dute, beti ere aipatu hiru irizpideen arabera: zuzen, argi, labur. Hala ere, jakina, honelako esamoldeetan, era bakarra adostu ahal balitz, askoz hobe.

Sortzaindiaren arlo zail eta ezinbesteko bat argota eta jargoia lirateke. Hori gabe ez dago hizkuntza bat osasunez bizi dela esaterik. Bizi dela ere esan ote daiteke? Argotaren iturri nagusia hizkuntza arrotz batek –gure kasuan, espainolak eta frantsesak– izan behar badu, laster geldituko da asistentzia klinikoaren mende. Euskararen modernokuntzaz kontziente garen askok –gehienok ez esatearren– gatazka hau galdutzat ez ote daukagun susmoa daukat. Eta arlo hori galdutzat jotzea euskarak erremediorik ez daukala aitortzea litzateke. Euskarazko 'umorea' egiten duten askok (gehienek?) nolako hizkera erabili ohi duten entzutea besterik ez dago, auzia 'susmotik' harago aspaldi joana dela baiezteko.

Gorago aipaturiko Toribio Etxebarriaren Eibarko euskarari buruzko lanean, eta, azken urteotan, hainbat eta hainbat herritan egin diren herri-hizkerei buruzko lanetan, material handia dago sortua eta jasoa. Beste lan asko ere izango dira (unibertsitatea, telebista eta irratietako programak, euskarari buruzko aldizkariak, aldizkari lokalak, ikasleen lanak...), argot-hitzak biltzen dituztenak. Hori guztia, era antolatu batean, euskara batura integratzea hain utopikoa al da? Sortuta dagoena eta sortzen ari dena sozializatzeko gauza ez bagara, nola izango gara ez dagoena sortzeko gauza? Hala ere, sortu egin beharko da, jasotzerik osoenean ere, hutsuneak agertuko baitira. Hain zaila al litzateke kate sortzaile bat antolatzea eta

finkatzea? Beharbada, kateak, unibertsitate eta abar, sortuak dirateke, eta jardungo dute lanean. Ez dakit. Dakidana da sorkuntza antolatu guztien azken hedabide efektiboa hiztegiak direla, eta horietan ez dudala ikusten esaten ari naizenaren islarik. (Oraingoan, ez naiz duela 20 urteko egoeraz ari, gaurkoaz baizik, 2010ean). Dozenaka, agian ehunka izango dira, Euskal Herri guztian zehar, herri-hizkerei buruz egindako ikerketa lokalak, asko udaletako kultura-sailek finantzatuak. Horietatik zer pasatzen da batura, pasatzea merezi duela emanik? Hortxe gelditzen dira euren bitxitasun kasik etnografikoan. Gure hiztegietan, hizkuntzaren korronte handiak falta dira oraindik. Batzuk, euskarak badituenak, eta beste batzuk, seguruenik, hutsune gisan agertuko direnak. Baina hutsuneak berdintzen hasterako, lehenik, beteuneak ustiatzen eta denenganatzen jakin behar da.

Eta hau eta hori eta beste... Sortzaindiak baluke sobera zeregin. Bertsolarien topiko batez amaitzeko, oroit gaitezen garaiz, ez damutzeko berantez. Garai hori joana dela pentsatu beharrik ez dago, baina joaten ari dela sinetsi nahi duenari motiborik ez zaio falta.





# ANTOLAPEN ANIZKOITZA ETA KOORDINATUA

Lan honetan esandako guztia (eta esan litekeen beste edozer) burutzeko era efektibo bakarra antolatze piramidal bezala irudikatzen dut. Sail ezberdin eta beharrezko guztiak era koordinatuan garatuko dituen erakunde bat. Sare interaktibo bat, non ekarpen bereizi guztiak kriterio orokor eta operatibo batek bahetu eta aurrera botako dituen. Norbaitek ihardets lezake erakunde hori badela, edo baden bat izan daitekeela, adibidez, Euskaltzaindia. Ez dut uste oraingo Euskaltzaindiak erantzukizun hori har lezakeenik. Lan honetan bere desioa aldarrikatzen dudan hiztegi nazional bakarraren egile, lantalde nazional batek izan behar du. Hots, batetik, euskalki guztiak ondo ordezkatzen dituena, eta bestetik, euskara batuaren konbikzio sendoa eta nazionala duena. Bertan, premia praktikoek eta eguneratze etengabeek agintzen duten hiztegigintza izan daiteke nukleo gidaria. Azken batez, ekarpen interesgarri guztien hedalekurik efektiboena hiztegi orokor bat dela diost, bai neure esperientziak, bai besteengan ikusi dudanak. Hizkuntzaren erregistro guztietan (ohiko lexikoa, esapideak, argota, jargoiak, sloganak, seinaleak, ohar, iragarki eta dei laburrak, formula publizitarioak...) lortzen diren aurrerapen guztiek hiztegi

horretantxe integratuz joan behar dute. Baita gramatika, sintaxi, aditz eta bestelako auzi garrantzitsuek ere, hiztegiaren antolamendu ordenatu batean. Ekarpen guztiek tresna bakar eta efektiboena den horretara iritsi behar dute, era batuan eta efektiboan zabal daitezen.

Ekarpenak hain sail ezberdinetakoak izanik, sailon ekoizpena ustiatzeko era koordinatu bat besterik ez da behar. Antolapen bat, hitz batez. Zertarako da argotean, adibidez, hitz edo esapide interesgarriak han-hemen jasotzea edo asmatzea, gero tresna komunean integratuko ez badira? Edozer ez da, noski, kategoria goren horretara (nazionalera) iristeko gai izango. Horretarako da hautu kritikoa edo erabaki selektiboa. Baina zertarako planteatuko da hautu kritikorik edo erabaki selektiborik, gero ezertara iristeko prozedurarik ez izatekotan? Bitxitasun anekdotikoetan gelditzekotan? Dena da kontzientzia, borondate eta antolapen kontua. Borondaterik ezin da izan, aurretiko kontzientzia bat gabe, eta biok ere alferrik dira, araberako antolapen bat burutzeko gauza izan ezik. Saiakera guztia premia horrexen arrazoitze bat izanik, araberako antolamen bat (antolatzeko ahalmen bat) ameskeria al da? Galderak zalantza bat darama oinean, baina ez dela ameskeria aldarrikatzen saiatuko naiz, kulturarentzat aro hobeak etorriko diren itxaropenean.





# AZENTUA, ORTOGRAFIA ETA...

Azkenik, badakit azentua, ortografia eta beste zenbait arazo oraindik eztabaidan daudena. Ez dut ukatzen euren garrantzirik, baina lan honek planteatzen duen arazo-multzo nagusiaren ondoan, horiei eta beste zenbait gairi gorabehera txikiak deritzet. Zuhaitzaren irudira jaitsirik, ez daukat hostoen koloreaz desesperatzeko gogorik, enborrak kezkatzen naueno.

# DINOSAUROAK HORIZONTEAN (2007)

Sarreran esan bezala, urte pila handia da saiakera honen lehen idazketa egin nuela. Oraindik *Elhuyar Hiztegia* eta *3000 Hiztegia* argitaratzeko zeuden. Eta zer esanik ere ez, *Zehazki Hiztegia*. Lanaren berrikuste bat hiztegi horiek agertu eta gero burutu nuen. 1996 inguruan, beraz. Ordutik, zenbat euri egin duen ez dakit, baina haizeak asko korritu du. Argitaratzeko azken une honetan, ez naiz berrikuste handian aritu, lanaren funts nagusiak, dudarik gabe, aktualitatean dirauela pentsaturik. Baita gogaiturik ere, kontu hauei eragiten.

Oraintsu, *Joan ziren* zikloko lehen liburukiaren aurkezpenerako (*Dinosauroak horizontean* eleberria), hizkuntzari buruzko gogoeta luze samarrak ere eginak nituen. Aurkezpenean ez nituen, noski, denak irakurri, baina idatzita eman nituen, eta interesgarri iruditzen zait zenbait pasarte hemen sartzea, saiakeran zehar azaldutako hainbat punturi dagozkienak.

"Euskal kulturan –nioen–, euskarak berak darrai gai zentrala izaten. Ez da seinale ona. Batzuek, hizkuntzaren erostariek, beti alde ilunak

nabarmentzen ei dituzte. Beste batzuek, hizkuntzaren jostariek, jarrera baikorrak aldarrikatzen. Hauek ere liburuak idazten dituzte gaiari buruz. Nik ez diot funtsik ikusten ez pesimismoari ez optimismoari. Horiek aldarte psikologikoak dira, batzuetan kafe baten edo pare bat zurruten gorabeheran daudenak. Nahiago dut gaitzak ahalik objektiboen seinalatu, eta batez ere, soluzioak probatu.

Euskara esan dut, baina hemen euskara asko dabiltza. Batzuk euskara estinktoak dira. Euskara ofiziala edo administratiboa, oro har, euskara estinktoa da. Halaber, idazlan eta itzulpen askotan ageri dena. Neuk ere kolaboratu izan dut estinktzio horietan, hartzen dituzun enkarguetan, saiatzen baitzara enkargatzailearen irizpideak aplikatzen, norbereak aparkatuz. Orain, euskalkienganako estimu berrituan, hitz egiten den modura idaztea baloratzen da. Hizkuntza hori ez da berehala estingituko, kultura nekez bezala, inkultura berez hedatzen baita, naturaltasunaren presuntzioa aurretik dela. Freskotasuna.

Aurrera joango den euskara, joaterik lor baleza, ez dago argi nolakoa izango den. Ez dut uste liburu honetan datorrenaren antzik izango duenik. Estutzen banauzue, beldur naiz hau ere ez ote den euskara estinktoen zerrendan sartu beharko. Baina nik, dudak erregalatu eta neure segurantzekin jokatzea erabaki dudanez gero, laburpentxo bat egingo dizuet, liburu honetan aurkituko duzuen euskarari edo kontra-euskarari buruz.

Aspaldi idatzi nuen saiakera luze bat, ordenagailuan lo gozoan datzana, heriotza izoztuan ez esatearren, han azaltzen ziren kontuak aurreratuko lituzkeen foro zabal eta operatibo baten zain. Utopia txiki bat, handiena bezain inposiblea, seguruenik. Hemen jendea alai bizi da, bakoitza bere mirariagaz, ignorantzia ausarta bezala, inkontzientzia pozkorra izaten baita. Zortea da hori ere. Aurkezpen hauxe baliatu nahi dut laburpen bat eskaintzeko, susmaturik ez dudala inoren alaitasaunik izorratuko.

Nondik dabil gure hizkuntza? Egin dezagun travelling txiki bat, lagin etsenplar bat emanez. Argi utzi nahi dut hemen esaten direnen jomuga ez direla ikasleak edo hiztun arruntak. Horiek, hizkuntza guztietan bezala, ahal duten moduan hitz egiteko eskubidea daukate. Euskara idatziaz, prentsaz, liburuez, idazleez ari naiz. Eta euskara mintzatuan, maila erreferentziala suposatu behar zaien esatariez.





## 1) AKATSAK

Akatsetatik hasirik, egiturarik oinarrizkoena den deklinabidea ere ezin dugu ondo eroan. Mugagabea galbide azeleratuan doa. Hala ere, misterioren bat hor badela entzuna dugunez, erabili egingo dugu, gutxi gorabehera. Hots, aldrebes! Ezin dugu bereizterik lortu *lau haizeetara-lau haizetara, mendeetan-mendetan, eskuetan-eskutan; beste gauza-beste gauza bat, beste tokietan-beste toki batzuetan, burdina artean-burdinen artean, itsasora begira-itsasoari begira*. Lasai kantatuko dugu *edozein herriko jaixetan* zein *minutu batetako isilunea gorde*. Berdin entzungo duzu *hartza batek jan zuen, ez da izango beste goizerik*, nola *ez daukat poltsik, ez dago dudik*. Ezin dugu asmatu partikula batzuk *(ere, baita, ezta...)* non ipini, ez nola erabili *inor, inoiz, inon, ezer*... Izen arrunten eta berezien erabilerak hibridatuz doaz. Oraindik ezin dut ulertu zergatik deklinatzen den mugagabean 'internet', *interneten sartu, internet ipini, interneti esker*. Nor da edo zein hiri- edo toki-izen da 'internet' hori, Monet edo Tibet bailitzan?

Lehen *boz-bozketa-bozkatu* bazen, orain *bozka*-k agertu dira. 'Vozkak'? *Zotz, zotz egin, zozketa* bazen, orain *zozketatu* egiten da. Laster entzungo da: *bozketatu, erosketatu, orrazketatu*. Sorkuntza sonoroa. Ezin dugu bereizi *hilean mila euro-hilero mila euro, etsaiak bihurtu dira-etsai bihurtu dira; nahi dut izan-nahi dut izatea; jolastu-jokatu; zale-zaletu; agur egin-agur esan, sagua-arratoia*... Orain, ordenagailuek 'arratoia' daukate. Brrrfff!! Lehen, hitza *hil-hila-hilean-hilaren-hilek* zen, eta kasu jakin batzuetan, *hilabete*. Orain dena da *hilabete: datorren hilabetean, hilabetearen azkenean*. Analogiak laster zabalduko du *mendebete, urtebete*.... *Mendebete batek ehun urtebete, urtebete batek hamabi hilabete, hilabete batek lau astebete, astebete batek 24 ordubete, ordubete batek 60 minutuasebete, minutuasebete batek 60 segundonatibitate-asetabete*. Txikiagoen handitasuneranzko progresio kuantikoa. Izenordainen indartzea (*ni-neu, ni-nihaur, zu-zerori*) galtzera doa. *Nik neure zeregina daukat, zuk egizu zeurea* esan badut, transkripzioan zuzendu egiten didate: *nik nire zeregina daukat, zuk egizu zurea*.

## 2) GAZTELANIA

Akatsen iturri handietako bat gaztelania da. 'Noskibaieztarrak'

eurenean tematzen dira, jo ta ke, irabazi arte: *noski baietz, noski ezetz, horixe bai, horixe ez*. Zergatik? Gaztelaniaz *claro que sí, claro que no, eso sí, eso no* delako. Ezin dute ikasi *bai noski, ez noski, bai horixe, ez horixe* behar duenik. *Nolanahi, nolanahi ere, edonola, edozelan be* eta horrelako lokuzio dotoreen tokian, orain ozen dabiltza *edozein kasutan, edozein modutan, era guztietara, guziarekin* ere... Zergatik? Gaztelaniaz *en cualquier caso, de cualquier modo, de todas formas, con todo* delako. Euskal Herri guztian finkatuta zegoen esamolde bati (*joan den astean-datorren astean*; edo *heldu den-iragan astean*), orain hirugarrena nagusitu zaio (*pasa den astean*), gaztelaniaz *la semana pasada* delako. Ezin ditugu bereizi *hobe-hobeto-ondoen, gehiago-gehien, gutxiago-gutxien*... gaztelaniaz konparatibo zein superlatiboak *mejor, más, menos* direlako. Horrela entzuten dira *hobe esanda-hobeto da*. Justu-justu, aldrebes, gaztelania ere gaizki interpretaturik. Ezin bereizi *zer ikuskizun-nolako ikuskizuna-bai ikuskizuna*, gaztelaniaz hirurak *qué* direlako. Edo bereiztu nahian, dena aldrebes: *zer ikuskizuna-nolako polita!* Lehen, *gehien zeukanak gutxien ematen zuen*; orain, *gehiago daukanak gutxiago ematen du*. Izan daiteke hau ere, baina esamoldea, erdaraz zein euskaraz, superlatiboan izaten da, gehienetan.

Lehen, moderatuak ginen. Orain (barka, Garzón) *etamania* alarmanteki handituz doa. Arteko *nahiz eta, zeren eta* bezalakoez gainera, aspaldion dena da *edo-ta, baizik eta, zinez eta, baita eta, ezta eta*. Partikula arriskutsu hori zernahiri eranstea ustez sobra duenari kentzearen ordaina izan daiteke, zeren orain *bi mila zazpian, mila bostehun*, eta horrela zenbatzeko moda abiatu da. Baliabideen birbanatze arrazionala lirudike, gaztelaniaz *dos mil siete, mil quinientos*, eta horrela delako ez balitz. Orain arte, gauzak *lehenago edo geroago* gertatzen ziren (diminutiboan, *lehentxoago-gerotxoago* eta abar). Orain, *goizago edo beranduago (más tarde o más temprano)*. Gaztelaniaz ere bada *antes o despues*, baina horrek ez digu graziarik egiten. Berdin datorkizu bigarren gola *hamar minutu beranduago*, zein bigarren mundu-gerra *lau urte beranduago*. Ez nekien golak sartzeko edo gerrak hasteko ordu bat zegoenik. Gogaitzen hasita zaude, eta *oraindik partida asko falta da*, diotsu esatariak. *Dedio! Zenbat partida baina, bat amaitu ezinik badabiltza?*

Euskaraz, lehen, *animoa ematen genuen, indarra genuen, gogoa, probabilitatea, zalantza, harremana*... izaten genuen, baina gaztelaniaz





*tener oportunidades, medir fuerzas, dar ánimos, ganas, probabilidades, relaciones, dudas al respecto, trazas* direnez gero, orain geu ere *harremanetan gaude, antzak dauzkagu, gogoak etortzen zaizkigu*. Guretzat, eguraldiak *euria egiteko itxura* zeukan, gaztelaniaz *trazas de llover*. Nik *kaka egiten dut*, zuek, beharbada, *cacas*. Nik probabilitate bat nahikoa dut salbatzeko. Zuek, beharbada, *probabilidades de salvación* beharko dituzue. Eta probabilitate batek salbatzen bazaituzte, bidezkoa denez, besteekin zer egin behar duzue? Honegaz ez dut gaztelania kuestionatu gura. Hizkuntza bakoitzak bere erak garatzen ditu. Gurea, singularrean, ez zen logika txarra, baina gaztelaniak seduzitu gaitu. Aperturismo kulturala.

## 3) HOBE BEHARREZ

Dena ez da negatiboa. Ondo dagoena hobetzen ere badakigu. Lehen *euria, elurra, izotza 'egiten' zuen*. Orain BOTA egiten du dena. *Gaur euria botako du* iragartzen dutenean, ez naiz ausartzen ohetik jaikitzen. Lehen, *badaukat indarra, badago denbora, badute aukera*... izaten zen, baina euskararen berezitasun exotiko bat partitiboa zela entzun genuenetik, dena da *badaukat indarrik, badago denborarik, badut libururik*, ohartu gabe *badut liburu bat, badut liburua, baditut liburuak* eta *badut libururik* gauza ezberdinak direla. Z atzizkiaz liluraturik, ezin ditugu bereizi *ikusiz-ikusita, goizez-goizean, gauez-gauean, trenez-trenean, autoz-autoan*. Hasten gara ohar zerrenda bat ematen eta: *Hiru gauza esan behar ditut. Lehenengoz... Bigarrenez... Hirugarrenez...* Hirugarren aldiz esan behar al digu gauza bera?

Orain *aurretik* ez dago ezer. Dena da *aurrez: aurrez esan, aurrez pentsatu, aurrez ikusi*. Horrela, auto batek albotik aurrez jotzen zaitu, eta ez dakizu aurretik ala atzetik eman dizun. Lehen, bereizketa dotorean, oso esamolde diferenteak ziren *badakigu, jakin dakigu, jakin badakigu*. Eginda! Hirugarren horixe borobila. *Jakin badakigu konponbidea zaila dela*. Eskerrak! Pentsatzen gelditzen naiz: *Jakin badakite, baina ez dute esan nahiko?* Euskalkien aberastasuna ere baliatu nahi dugu, norbere inguruko hitzak urrungo sinonimoekin ordezkatuz. Orain, Hegoaldean, hizkuntza jasoa egin nahi duenak *egun, haratago, biziki, so*... esan behar du. Ez zait gaizki iruditzen, noizean behin *gaur, harago, begira* ere ez ahanztekotan. Grina hori aspaldi asmatu zuen haizeak: *Hemendik harantz eraman eta hangoak honantz ekarri*. Edo errima aldatzea komeni bada: *Hangoak*

)onantz ekarri eta hemendik harantz eroan. Edo lokalismo interesgarri bat ahi izanez gero, *hangoak honuntz ekarri eta hemendik haruntz eraman.* Edo zergatik ez, haize handi samarra badabil, *hangoak hemen txikitu eta* )emengoak han puskatu?

Sinonimoen trafiko antzu samar hori baino gehiago estimatuko nuke uskalki bakoitzak dauzkan hitz espezifikoak euskara osora zabalduko alira. Hona, esaterako, bizkaierako batzuk: *neba, biago, berbaro, aramon, zoldu, ezein, jas, kontixu, marro, papar, ugazaba, zindo.* Euskalki akoitzaren ondare espezifiko hori (kontzeptu diferenteei dagozkien hitzak do azepzioak) euskara osora zabaltzea, hori bai litzatekeela aberastasun azionala, eta ez hainbeste, hitz beraren aldaerak edo kontzeptu beraren inonimoak tximeletatze soilean gelditzen den exotismoa. Norbere *gaur* eta *so* ordez, haragoko *egun* edo *biziki* esateko kapritxoa sentitzen duenari, *naia* edo *siesta* ordez, *neba* edo *biago* ez gustatzea hizkuntz kultura akitikoaren adierazgarritzat bakarrik uler daiteke. Auzia ez da batere utsala, irizpide horri zentzu sanoarekin helduz gero, euskalki guztien rtean, milaka hitzek sartu beharko bailukete hiztegi nazionalean.

4) ADITZA

Euskal aditzaz, mirariak sinetsi izan ditugu. Nork-nori-nor adierazten ituela, plural-singularrak, tratamendu markagabea zein markatua (hiketa naskulino-femeninoak eta zuketa), denbora hipotetikoak, aditz laguntzaile nordoa, transitibo-intransitiboetan ezberdinak, eta bakoitzaren barruan re ezberdinak (*edun, ukan, izan, edin, ezan, egin*). Hitz batez, hiztunen uruhauste amaigabea, mirariak, gehienetan, inkonprensibleak izaten aitira. Kontua da hain hizkuntza bereziaren bikaintasun miragarrietako atzat geneukan aditz hura, orain bera dugula problema nagusietako bat. zan ere, ez da pentsalaria izan behar, aditz laguntzailea oso tramankulu stuna, lastatsua, deserosoa dela ateratzeko. Hain ugari ditugun aditz onposatuen kasuan, berriz (*arnasa hartu, gorroto izan, hasperen egin*), ramankulua bikoiztu egiten da. Gaztelaniazko *lloráis, reíais, cederíais* ezalako adizkera bakunek euskaraz hiru elementu behar dituzte: *negar giten duzue, barre egiten zenuten, amore emango zenukete.*

Aldi berean, harritzen zara aditz trinkoak zergatik diren hain





gutxi eta direnak zergatik doazen miserableki gutxituz. Gero hasten zara entzuten aditz-forma asko eta asko (*diezazkioket, diezazkidazun, liezazkidakete, gatzaizkizue, neramazkizuke, zakizkidaten, litzaizkidake*, eta ehunka) inbiableak direla. Orduan zertarako daude aditz paradigmetan? Zailtasunak edo ezintasunak erakutsi ondoren, entzuten duzu: *Zertarako hainbeste subjuntibo, ahalezko, ondoriozko, alegiazko?* Halako zerbait nola, kamioi handi bat ikusi eta: zertarako hainbeste ardatz, hainbeste gurpil? Edo motor batean, hainbeste pieza eta mekanismo? Haluzinaturik gelditzen zara, hizkuntzaren arintasunerako, menpeko perpausak (subjuntiboak eta abar) saihestea eta halako zozokeriak iristen zaizkizunean ahots eskolatuen ahotik. Orduan, erdaretan hamar urteko edozein haurrek esaten dituen gauza sinpleak: *¿Puedes darme esas gafas? ¿Qué he hecho yo para que me rompas la bicicleta? Quiero que me cortes las uñas. Te rompería los dientes. Cóseme los pantalones,* horrelakoak euskaraz ezin al ditugu esan? Edo, norbaitek esaterik lortzen badu, hizkuntzaren magotzat, eredu kimerikotzat jo behar al dugu? Ezin dut igarri gakoa non dagoen, hipokrisian ala inkulturan.

Aditzaren erosio desesperagarri horretan, eta beraganako etsipen kasik atseginez konsentitu horretan, formarik arruntenak ere degradatzen ari da. Aktore batek *ikuste'stezue? ikuste'idazue?* galdetzen du, eta inork ez dio barrerik egiten. Berriz ere, *ikuste'idazue? – Bistan daukak!,* erantzuten dio ikusle arkaiko batek, eta inork ez du harrapatzen gakoa. Erosio desesperagarri hori –diot– badakit egun batetik bestera ezin dena inbertitu, baina norabide batzuk bila litezke. Liburu honetan saiatu naiz, seguruenik alferrik, ildo batzuk markatzen, hala nola aditz trinkoena. Euskara lantzen hasi nintzenean, seminarioko urte ito haietan, aditz trinkoen erabilera aberastasuntzat azaltzen ziguten, eta halaxe irentsi genuen, gaztetasun sineskor, txundikor hartan. Gero ez nintzen gutxi zapuztu, ikusi nuenean, beste hizkuntzetan, hizketan abiatua zen edozein haurtxo Oihenart baino askoz aberatsagoa zela aditz trinkoetan. Miraria mingoski irentsi nuen.

Hala ere, geure gomutan bizi izan dugu aditz trinko berez ere urrien galera gupidagabea. Orain, *darrai, leroake, lebilke* idazten baduzu, espezie estinktotzat jotzen zaituzte. Irakurtzen ikasi aurretik, gizarte euskaraz analfabeto batean, hain normal kantatzen nituen: *Bart gaberdian harek / (z)eroan katua / ha zekusenak hutsik / ez (z)eukan barrua.* Edo: *Andra*

*galantak Azkoitin dira / galantagoak Azpeitian / heldu nintzanean neu Arratian / artazukua zirakian.* Horiek orain, gizarte unibertsitarioan eta euskara ia digitalean, arkaismo nostalgikotzat jotzen dizkizute. Burutik sano ote gaude? Ba, nik, inteligentziari uko egiteko gogorik ez daukadanez, *letorke* bezain bidezko dakust *lerorke* edo *lerantzuke; dakart* bezala *dantzut* edo *daurkit; dihardu* bezala *diragar* edo *darakus; daramaiot* bezala *damaiot* edo *dagiot*. Ez naiz abusatzen saiatu. Norabide bat markatu, soilik. Ez du arrakastarik izango, baina bai konstantzia bat utzi, inteligentziaren bideak nola estrangulatu genituen.

## 5) ERLATIBOA

Hizkuntza ororen egiturarik garrantzitsuena, seguruenik, eta literarioki emankorrena, dudarik gabe, erlatiboa izango da. Murrizgarria eta ez-murrizgarria daudela ikasi nuen. *Hauxe da gure alkatea, bosgarren legealdia daroana.* Ez-murrizgarria komaz banandu ohi da, bitasun konkordatua osatuz. *Hauxe da bosgarren legealdia daroan alkate bakarra.* Murrizgarria bere mende dagoen izenaren aurre immediatoan jartzen da, unitate bakarrean. Kasu gramatikalak (aditzean isla dutenak, hots, NORK, NORI eta NOR)dira erlatibagarrienak. NOR: *Nik maite dudan lagunak maitagarria izan behar du.* NORK: *Maite nauen laguna maitagarria da.* NORI: *Nik maitasuna diodan lagunak maitagarria izan behar du.* Badira beste salbuespen batzuk, zuzenean adierazten ditugunak, batez ere non kasuan: *orain bizi naizen etxean ez dago igogailurik; lehen lan egin nuen enpresatik berriro deitu didate.* Eta ez hainbat idazlek ez dakit nondik atera dituzten formak, gero euskaltegietara izurritean pasatu direnak, hala nola: *orain bizi naizeneko etxean; lehen lan egiten nueneko enpresatik,* eta horrelako extrabagantziak. *Nor, nori* eta *nork*, beraz, oro har.

Eta beste kasu guztiak? Noren, norekin, norentzat, norengan, norengana, norengandik, non, nondik, nora? Erlatibo ez-murrizgarriarentzat, badoaz nola-halako formak ezartzen. Erlatibo murrizgarriaren kasuetan, ostera, urkatuta gaude. Nori azaldu behar diogu hizkuntzaren egiturarik garrantzitsuenaren kasurik gehienak adierazi ezin dituen erlatiboa daukagula? *El único sueldo del que vive mi familia, la persona con quien convivo, la persona para quien trabajo, la persona en la que me apoyo, la persona de quien dependo, la empresa en la que trabajo, el vagón donde*





*viajaba, el mundo del que provengo, el destino al que me dirijo.* Erdaretan edozein haurrek molda ditzakeen esaldi sinpleak euskaraz ezin ditugu osatu. Nire aholkulariak diost erdaretako haurrei (eta helduei ere) asko kostatzen zaiela erlatiboa ondo erabiltzea, eta horregatik sortzen direla *"que le", "que su", "que con él"*, etab., honako hauen ordez: *al que, cuyo, con el que*. Sinesten diot, baina euskaraz gertatzen dena ez da baduguna gaizki erabiltzea (hori ere bai, noski), baizik baliabidea bera falta izatea. Gramatikek zer egiten dute? Albo, zordun handiak hartzedunagaz topo egiten duenean bezala. Eskerrak itzulpengintzan inbentua aurkitu zuten: erlatibozko perpausa zatitu, puntua, eta aurrera bolie. Hogei urteko gazte bat erdibitzea bezala, hamarna urteko bi haur sortzeko. Eta hirurak akabatu! Hemen erlatiboa behar dugu, ez puntuak eta pitokeriak.

## 6) LEXIKOA

Beste hainbat arlo aipagarri utzirik (konkordantzia, erreflexiboa, kontsekutiboa, generoa, era pasiboa, eta abar eta abar), gatozen, azkenik, lexikoaren eremu selbatikora. Selbatikoa, ez hedaduragatik bakarrik, nahasmenagatik baizik. Eta, oraingoz, utz dezagun albora lokuzioen eta argotaren eremu demoniozkoa.

Teorian defendatu eta onartu ohi da maileguak hartzeko dudarik ez dela izan behar hitz 'kulto' edo 'teknikoetan'. Adibideak jartzean, hor joaten dira betiko *telefono, mekanika, kosmos, robot, atomo, energia, ideia, sinkronia,* eta abar. Horrelako hitzak ehunka dira, noski. Jatorri grekodunak badira, beti ere lasaiago gelditzen gara. Hitz kulto edo teknikoen presuntzioak, ostera, eremu murritzegia hartzen du, oso zehazgabea eta sarritan arbitrarioa. Zuzenen eta praktikoen deritzodan irizpidea 'hitz komunak' dira. Nortzuen komunak? Gutxienez, mendebaleko ondare kulturala eta zientifikoa garatu duten hizkuntzena. Gure inguruko hizkuntza hain ezberdin eta sendoek partekatzen duten unibertso kontzeptuala euskara bezalako hizkuntza txiki eta ia agoniko batek bere baitatik berrizendatu nahi izatea ez dabil urrun temeritate suizidatik. Ahalegin temati horretan, euskal hitz bat erdarazko dozenaka hitzen ordain agertu ohi da. Adibidez:

(Adibideak saiakera honetatik hartuak izan ziren, eta, beraz, hor daude gorago, euren tokian)

Hona gure inguruko hizkuntza guztiek konpartitzen dituzten milaka hitzetariko batzuk, euskal hiztegiek era nolabaitekoan itzultzen dituztenak:

*Deference, examine, exhibit, expose, finality, horrible-horror, invent, intervention, invalid, intermittent, irritate, mediocre, native, negligence, obscene, observe, offend, oportune, penetrate, perceive, persistent, possession, precedent, pretend, prevail-prevalent, reciprocal, redact, redeem, relate, remit-remittent, repudiate, rescind, reside-resident, restrict-restriction, rude, select-selection, sequestrate, sublime, submarine, supplement, tact, verify.*

Gure inguruko erdarek, oinarri-hitz batetik abiaturik, multzo edo konstelazio luzea lerro berberetik garatzen dute, salbuespen oso gutxigaz:

(Hemen ere, saiakeratik hartutako zerrendak)

Ireki ezazue edozein hiztegi arrotzetako lehen orrialdea, eta hortxe aurkituko dituzue, ilaran, honakoak:

*Abandon, abandonment, abbot, abdicate, abdication, aberration, aberrant, abject, abjection, abjure, ablution, abnegation, abolish, abolition, abominate, abominable, abomination, abrasion, abrasive, abbreviate, abrogate, abrogation, abrupt, abscess, absent, absence, absent (to), absolute, absolution, absolve, absorbent, absorb, absorption, abstemious, abstain, abstention, abstinence, abundant, abundance, abound, abuse (to), abuse, abysmal, acclaim, act, activity, credit (to), accreditation, actuate, adapt, adaptation, adaptable, adhere, adherence, adhesio, addition, adjudge, administer, administration, admire, admiration, adduce, adopte, adoption, adorn, adornment, adore, adoration, adulterate, adulteration, adult, advance, adventure, academy, accommodate, accede, accelerate, accent, accept, acceptance...*

Horrela, milaka eta milaka sarrera, hiztegi oso samar batean. Euskal hiztegietan, horietariko 20.000 inguru falta direla kalkulatu nuen. Ikusten duzue gure inguruko hizkuntzek nolako paralelismo ia dogmatikoa daramaten. Orain begira itzazue gure hiztegiak, eta ikusiko duzue nolako nahasmen selbatikoan gabiltzan, oraindik ere. Hitz komunak irizpide sendo batzuen arabera mailegatu behar dira, jakina. Orain ez naiz irizpide horiek (ez dira asko ere) azaltzen hasiko, baina nire *Dinosauroen horizontean*, honakoak aurkituko dituzue, A letrako batzuk jartzearren:





*Abalantxa, abandono, abantzatu, abertsio, abismal, abordaje, abrumatu, abruptu, absorbente, abstrahitu, adaptatu, adaptazio, adberso, afektatu, adkiritu, adulatu, adulteratu, aduzitu, afliktibo, agrabante, agradatu, akomodatu, akonpainatu, akonplexatu, akosatu, aktu, aktual, aktualitate, aktualizatu, akumulatu, akumulazio, alkantzu, aloiatu, altisono, amable, amenizatu, amabilitate, amonestatu, amortiguatu, amortiguazio, anal, anbiental, anbientazio, angelikal, angustia, angustiatu, angustioso, anihilatu, anihilazio, anpliatu, anpliazio, antsietate, antsios, antezedente...*

Amaitzeko, eta arazo sozialak eta politikoak alde batera utzita, apenas den dudarik, euskarak interbentzioa behar duenik. Horretan ari gara denok. Baina interbentzioak globala, konbergentea eta norabide zuzenekoa izan behar du. Eta norabide zuzena bakarra izan daiteke. Jakina da euskararen garapena estrangulaturik gelditu zela, garbizaletasun fundamentalista zela bide. Euskal hizkuntzalaritzan autoritate sakratu bat bilatu behar balitz, askok Mitxelena aipatuko lukete. Sarritan entzun dut Mitxelenak erdibidetik jo zuela. Hori egia bada, erdibidea ez ote zen leundu nahi zen mutur-bidea baino okerragoa? Bi mendietarik (zuzena eta okerra) batera igotzekotan, erdibidea da txarrena, ez baitarama ez batera ez bestera. Oraindik erdibide suizidatik irten ezinik gabiltza.

Izan diren aurrerakadak ukatu gabe, euskararen hizkuntz izateak (ez bakarrik egoerak) bi gaitz salatzen dizkigu: bata, inkultura handi samarra. Bestea, erudizio handia. Inkultura eta erudizioa batzen direnean, soluzioa oso zaila da, baina miraria posible da: erosioari eboluzio deitu, eta aurrera. Zuzentasun arauak edo kalitate irizpideak bihoaz ondare etnografikora, espezialistak nostalgien inbentarioa aberasten goza daitezen.

Inkultura eruditoa esan dut, beldur nintzelako beste gaitz fatalago bat izendatzen. Aipatu adibideetan eta aipa zitezkeen beste hamaika milatan, ziur nago, konprobatua baitut, iritzi gehienak bat letozkeela ehuneko... ia ehunean. Kasik ebidentziak baitira. Non dago gakoa? Erreakzio ahalmen urrian. Akatsek haizea bezala zabaltzeko grazia duten bitartean, zuzenketek

ezin dute, askotan, abiatzerik ere lortu. Gaitzaren kontzientzia eta guzti ere, ezin dugu hizkuntza sendoen ezaugarrietako bat den mekanismo zuzentzailerik garatu. Fisiologian, izen beldurgarria du horrek: immuno-defizientzia. Defentsek huts egiten dutenean, kontzientziak ere ez du balio.

Ez naiz ahultasunari barre egiteko bezain doilorra. Ahultasun kontzienteaz ere ez naiz ironiara ausartzen, alde intelektuala bakarrik interpelatzen dudala bereiziko ez ote duten beldurrez. Baina ez nuke plazerik galdu nahi, euskaldungo flotatzaile batek praktikatzen duela iruditzen zaidan ahultasun harroaz burlatzeko. Lehen, egoerak sufriarazten ninduen. Orain, fenomenoari kanpotik begiratzen ikasi dut, eta dibertsio polita da. Seguruenik, jubilazioaren eragina izango da, fenomeno mordo batetik kanporatzen zaituen eskailera mekaniko horrena. Zorionez, dibertsioak neugaz etortzea erabaki zuen, batez ere, arrazoia eduki ala ez ardura izateari utzi nionetik. Euskalopiteko gorena eboluzioaren katean urkatzen ikustea amaiera bibrantea da historia milenario batentzat. Zertarako nahigabetu behar dut? Euskara galtzeak baino pena handiagoa ematen dit neu hil beharrak. Eta alai bizi naiz. Ia-ia zoriontsu, zorionak beldurtuko ez banindu. Hainbeste txotxolo bere bila dabilenean, mmhh, kontuz! Nahiago dut alai bizi. Eta orain, hasieran sarrera-hitzak jan baditut ere, amaierakoak errespetatu egingo ditut, ez berez ezer balio dutelako, amaitu dela jakitea merezi duzuelako baizik. Beraz, labur eta ondo, eskerrik asko!".





# ORAIN EZIN NAIZ HIL (2008)

*Joan ziren* zikloko bigarren liburuki honen aurkezpenean ere, hizkuntzari buruzko iruzkin batzuk egin nituen, eta hemen doaz pasarte batzuk.

"Behin, Bitoriano Gandiagarekin hizketan –nioen–, harritu ninduen, esan zidanean: 'Nik, azkenerako, beti aurkitzen dot berba egokia'. Ez nion esan, baina pentsatu nuen: 'Nik baino zorte hobea daukazu, ze nik gura neukezen berbak, asko eta asko, jakin be ez dakidaz".

Maiz gertatzen zait objektu interesgarriak, sugestiboak ezagutzen ditudala; baina haiekin jokatzeko, erlazionatzeko, metaforatzeko, euren izenak falta zaizkit. Banoa gauez kalean, eta izendatzen ez dakidan gauza piloa ikusten dut. Izen horiek beste lanbide batek eman zitzakeen, beharbada. Lanketa pertsonalak ere bai, noski, baina orain, jada jubilaturik, denbora mugatuegia daukat karrera berrietan hasteko.

Beste aldetik, euskaran bertan ere, limitazio handiak aurkitzen ditut.

Oraindik askatu ezinik gabiltza Mitxelenaren inguruan formulatu zen 'erdibidearen' tiraniatik. Edo probintzianismotik. Zer da 'erdibide' hori? Bi tontor edo poloren arteko hautuan, ez batera ez bestera ez iristeko modurik zuzenena? Zer esan nahi du garbikeria gainditzera zetorren erdibideak? Erdia 'garbizaletik' eta erdia 'ez hain garbizaletik' garatu behar zela? Zer da 'ez hain garbizale' hori? Despektiboki euskara 'mordoiloa' esaten zena? Baina erdibide sano bat sekula ezin daiteke atera 'garbikeria' eta 'mordoilokeria' bezalako bi eredu txarren konbinaziotik. Suaren eta kearen artean kokatzea bezalatsu. Ederra erdibidea, bizirik apartatzeko!

Funtsean gertatzen zena ez ote zen zorioneko erdibidea ez zela iparrik ezaren eufemismoa besterik? Sumatu genuen zoru inseguruan geundela, mugitu ginen zerbait, *atomo, kosmo, telefono, filosofia, metafisika* eta halako hitz-zerrenda topiko baten onarpenera bilduz milaka eta milaka hitzen auzia zena, eta posizio berriari izen erreberente bat eman genion. Ez genekien garbi non geunden ez norantz, baina erdibidea zen! Edo erdigunea, non amets librera lokartu ginen, eta sonanbulu jaikirik, berriz abiatu, esteparen bakartasun harroan, norabide zabunkari eta ezberdin guztietan, harik eta, noizbait itzartzean, ohartu ginen arte elkar ez ikusteko beste urrundu ginela. "*Ni hiltzen naizen gauean, behintzat, eizue lo lasai*".

Erabakia dut premisa argi batetik aurreratzea: ipar biderakusle hori mendebaleko hizkuntzen ondare komuna da. Suizidio linguistiko probintzianoa litzateke euskaldunok ere bertakoak garen unibertso kontzeptual hori guztia hizkuntza ia agoniko batean berrizendatzen saiatzea. Asko aurreratu dugula dantzut. Ez dut ukatzen. Aurreratu denak ez nau molestatzen. Nik falta den zuloa dakust. Eta bitartean sortu dugun nahasmena eta inprezisioa, kriterio argiago eta zehatzagoekin bakarrik gaindi daitekeena.

Horra adibide on bat: *kriterioa*. Badakit *irizpide* existitzen dena. *Hizpide* ere bai, *arnasbide, bizibide, lanbide, adibide* eta abar bezala. Baina ezin ditut *irizpide* eta *kriterio* sinonimotzat jo, berdin jo ezin ditudan bezala *hizpide-hizkuntza, arnasbide-arnasa, bizibide-bizitza, lanbide-lan, adibide-adimen*... Edo *inprezisioa* eta bere alderantzi *prezisioa*. Zientzia, teknologia eta arte guztietan hain termino funtsezkoa denari, gure inguruko hizkuntzek konpartitzen dutenari, *zehaztugabetasuna* asmatu diogu. Eta





gero, freskotasunaren izenean, ez dago erreparorik euskaraz hainbat ordain dituen '*ez da preziso*' bezalako lokuzio arrunt bat onartzeko. Eta, gainera, nahasmena. Prezisio = *doitasun*. Inprezisio = *zehaztugabetasun*. Zehaztugabetasuna. Hain hitz horriblea entzuteko sakrifizioa egin eta gero, konturatzen zara ez dakizula *inprezisioa, indefinizioa, inkonkrezioa, indeterminazioa* ala zer ulertu behar duzun. Jo ezazu horrelako hitzak badirela 20.000tik gora, eta kalkula ezazu arazoaren tamaina.

Zorionez, ondare komunaren "ideia argi eta bereizia" jarraituz, Descartesen definizio ospetsuaz baliatzearren, nire limitazio espresiboak asko zabaldu eta zehaztu dira".

Aurkezpen egun hartako iluntzean bertan, email bat heldu zitzaidan, non lagun ezezagun batek (neu ez naiz, behintzat, jabetzen nor den) bere oharrak bidali zizkidan nire aurkezpenari buruz. Interesgarri iruditzen zait pasarte batzuk hemen sartzea. Anonimatua gordetzen denez gero, ez dut uste inoren intimitatearen aurkako erasorik burutzen dudanik.

*Kaixo, Xabier:*

*Liburu berriagatik zorionak ematera natorkizu. Baina baita belarritik tirakada pare bat ere. Txartzat ez hartzea espero dut, miresmen handia dizun norbaitengatikbaitator. Galdusamarnabaritzenzaitutaspaldian, etaontzathartzea nahiko nukeen bizpahiru kritika eta aholkuren bat baino ez dizkizut eman nahi.*

*(...)*

*Kritikak ontzat hartzea ezinbesteko da, eta ideiak argi izanda ere, noizean behin zalantzan jarri behar dira. Garbizalekeriaz esaten duzuna egia izanda ere, ez da egia "Europa mendebaldeko hizkuntza guztiek" hitz tekniko beretsuak dituztela. Hezkuntza frankohispanoaren morrontza nabari zaizula uste dut, mundua eremu latinoa baino zabalagoa baita, eta euskaldunok ez gara eremu horretakoak, gainera. Zergatik ez begiratu alemanen eredura? Badituzte erro greko edo latinoko hitzak, baina baita beraiek sortuak ere. Hitzaurreko "imprecision" adibidez, "Undeutlichkeit" da, "deut" --> argi, deutlich, adj., -keit = -tasun, eta "undeutlichkeit" azkenean.*

*Honakoa ere esaten duzu:* "The Portrait of the Artist as a Young Man *nobelan, gaztelaniaz* Retrato del artista adolescente *bezala, eta nik* Artistaren gaztetako erretratua *itzuliko nukeen hartan...". Eta lehen kontu ekonomikoan aipatu dezun bezala, hemen ere gehiegi biluzten zara, eta zure gabeziak agerian uzten. Nabari zaizu atzerriko kultura espainolaren iragazitik hartu dezula, eta kasu gutxi egiten diozula euskaraz egiten denari, azken urteetan itzulpenean lan izugarria egin den arren. Joyce-ren kasuan, espainolezko itzulpena ematen duzu eta euskarazkoa ez! Eta badira 16 urte zure etxe ondoko argitaletxeak, Ibaizabalek, euskaraz eman zuela:* Artistaren gazteko portreta, *Irene Aldasorok itzulita (gero* Dublindarrak *ere itzuli zuen).*

*Tira, gehiegi luzatu naiz eta, barkatu gaizki esanak.*

Erantzuna honakoa izan zen:

*Kaixo!*

*Benetan eskertzen dizut horrelako lantegia hartzea, liburu berriagatik zorionak emanez gainera, "belarritik tirakada pare bat ere" egiteko(...) Lexikoari buruz, baditut (neuretzat, noski) ideia nahiko argiak eta irmoak. Lan luze bat ere badut horretaz aspaldi egina, oraindik ordenagailuan gorderik egon beharko duena. Lexikoaz eta euskararen zenbait gabezia edo arazo estrukturalez.*

*Diozu: "Hezkuntza frankohispanoaren morrontza nabari zaizula uste dut". Gu erdian eta azpian gauzkaten bi hizkuntza nagusiak horiexek dira. Errepasa ezazu zeure lexikoa, eta ikus zenbat daukazun frantsesetik, Iparraldean bizi bazara, edo zenbat gaztelaniatik, Hegoaldekoa bazara.*

*Diozu: "Mundua eremu latinoa bainoa zabalagoa baita". Baina nik, sistematikoki, ingelesari horiei adina edo gehiago begiratzen diot. Eta ingelesa ez da "eremu latinoa".*

*Darraizu: "Eta euskaldunok ez gara eremu horretakoak, gainera". Joño! Frantses, espainol, italiera, galego, portuges, katalan eta ingelesaren eremu guztia harturik, eremu horretakoak ez bagara, non gaude? Arkadian oraindik?*





*Diozu: "Zergatik ez begiratu alemanen eredura?". Galdera ez dago gaizki, baina alemanak urrun samar harrapatzen gaitu. Hala ere, onartzen dut. Nola ez diogu, ba, alemanari begiratuko? Ba, alemanari begiraturik, "inprezisioaren" ordaina ematen saiatu zaren bezala, ingelesarekin eta "mendebaldeko ondare komunarekin" bat datozen termino alemanak zerrendatzen badituzu, laster aurkituko dituzu mordo galantak, euskaraz oraindik alderrai dabiltzanak, 'inprezisio'-rekin batera aipatzen nuen 'kriterio' bera, esaterako. Hau, badaezpada, ez duzu adibidean jaso. Kontua da gure hiztegietan, oraindik, hainbat milaka terminotan, ez zaiola begiratzen ez alemanari, ez ingelesari, ez frantsesari, ez espainolari. Nik zerrenda luzeak eginak dauzkat nolako batasuna daramaten, alde batetik, ingelesak, frantsesak eta espainolak (beraz, katalanak, galegoak, italierak, portugesak...) eta kasu askotan alemanak ere, eta, bestetik, nolako kaosa garatu dugun euskaraz.*

*Eta, azkenik, hara, lagun! Niri ez zait hainbeste interesatzen gai horiei eta aipatzen dizkidazun beste kontu batzuei buruzko eztabaidarik. Niri interesatzen zaidana da egin dudan lan literarioari buruzko balorapena. Eta euskarazko lan literarioa denez, euskarari aplikatu dizkiodan zenbait soluzioren eta kriterioren balorapena. Ez dut arreta desbidetu nahi arazo kolateraletara, batzuk, gainera, gaitik oso urrun daudenak, hala nola argitaletxe, aholkularitza, euskarazko itzulpen, eta abar eta abar.*

*Idatzita uzteak damaidan beldurrez, eta horri buruzko eztabaidarik ere inondik nahi ez dudala, konfiantza gisan esango dizut euskaraz egin diren obra handien itzulpen asko ezin ditudala irakurri. Ezta neureak ere. Ni, klasikoen sailerako, Lukrezio eta Tazito itzulia naiz. Liburu horiek daukaten zirkuito txikian, oso kritika onak jaso izan ditut itzulpen horiengatik. Ba, neuretzat, ez dira itzulpen onak, ez daudelako nire kriterioen arabera eginak. Enkarguak zirenez, enkargatzaileen arauetara moldatzen saiatu nintzen. Neure kriterioen arabera itzuli banitu, atzera botako zizkidaketen.*

*(...)*

*Hartu duzun lantegia berriro benetan eskerturik, besarkada bat eta nahi duzun arte.*

*Xabier Amuriza*

Gutunaren erantzunak luzapen bat merezi duela uste dut. Alemanaren edo beste hizkuntza urrunagoko baten argudioak interesgarriak izan daitezke, baina, jotzen nuen funtserako, anekdotikoak dira. Eta, sarritan, engainagarriak, euskararentzat erlazio irrealak eta ezinezkoak planteatzen direlako. Alemanei errespeturik handiena diet, bi mundu-gerra deklaratu eta biak galtzeko kuraia izan zutenetik. Gernika ere erre zuten, baina euskaragaz apenas izan zuten beste harremanik, gure hizkuntza, handik lasterreko bigarren mundu-gerran, espioitzarako erabili izana baizik. Arlo militar higuingarriak alde batera utzirik (hortik begiratuz gero, hizkuntzarik gehienak gorrotatu beharko genituzke), pentsamen, kultura eta arte mailan, eraikuntza harrigarri eta, beharbada, handienaren jabe da hizkuntza alemana. Horrek ez du ezer kentzen, bere eragin-eremua euskaratik oso urrun aurki dadin.

Euskara, berez, ez ei da ez latinoa, ez anglosaxoia, ez ezer, lekutako antzinatetik gelditzen den hizkuntza-mota bakarra baizik. Indoeuroparren aurrekoa. Ez dakit. Oraindik jaiotzeko nengoen. Eta zer? Izaerarik ezberdinena badu ere, hizkuntza ez da airean bizi, hiztunengan baizik. Kasu honetan, euskaldunengan. Non bizi gara euskaldunok? Euskara hizkuntza latinoa ez izateak ez du esan nahi "euskaldunok ez garela eremu horretakoak". Pentsa, bestela, gure hizkuntzak zenbat hartu duen latinetik. Konta ezin ahala egitura eta hitz (baita jipoi ere), edonork dakien bezala. Orain-oraintsu egin dudan adiskide berri madrildar, hizkuntzetan oso aditu, eta euskara oso ondo menperatzen duenari (lan honetako nire aholkulariari) entzun niona aipatuko dut: "Euskara ez da hizkuntza erromanikoa, baina bai hizkuntza erromanizatua". "Bejondeizula –hots egin nion–, nahiz eta mintzen nauen Euskal Herritik kanpora etorri beharrak, zentzu apur baten bila". Eta latinetik bezala, pentsa zenbat hartu duen, geroago, frantsesetik eta gaztelaniatik. Baita eman ere, hizkuntzen arteko tratua ez baita dena hartze hutsa izaten. Orain, batere aditua ez izatearen kezkaz, baina ebidentziaren lasaitasunez, galdetuko nuke ea euskarak zenbat hartu duen alemanetik, eta zenbat eman dion. Arrazoia bistakoa da: bi hizkuntzek ez dute izan harremanik, hizkuntzalari aleman batzuek euskara aztertu dutela, eta euskaldun batzuek alemana ikasi dutela besterik.

Izango da eruditoren bat, argudioa irauliz, euskarari aleman, hungariera edo auskalo beste zein hizkuntzarekin erlazio teorikoren





bat aurkituko diona, baina ezer praktikorik nekez ekarriko digu hortik. "Mundua eremu latinoa baino zabalagoa izatea" arrazoi dohatsutzat joko nuke, euskararen mundutxoak eremu latino horren barruko geografia txiki-txiki, ia ezerez bat okupatuko ez balu. Gauden leku fisikoa –lurra– eta ditugun dependentzia direktoak aintzat hartuta ez bada, ez dakust nola lor genezakeen gorago desiatu dudan 'euskara potentea eta konpletoa'.

Itzulpenei buruz, egia da, batzuetan, neuk egindakorik ere ezin dudala irakurri, "enkargatzaileen arauetara jokatu behar izan nuelako, eta ez neure kriterioen arabera". Ez da, ordea, kriterio kontua bakarrik. Sarritan, euskararen beraren zuzentasun oinarrizkoan gertatzen dira akatsak. Hona, oraintxe bertan, nolakoak aurkitu ditudan, pare bat orrialdetan bakarrik, idazle unibertsalki ospetsu baten eleberri baten itzulpenean. Izenik agertu gabe, zati aipatuak ere disimuluz emango ditut, akatsak salbu, ez baitut inor mindu nahi.

– "Zuk baino hobe dakit".
– "Noski baietz".
– "Gaizki zegoenaren dudarik ez dago".
– "Hiltzear zegoelaz guztiz konbentziturik".
– "Ihes egiten zuen edozein tokietara".
– "Inongo bezerorik ezin zuen erosi, eta inongo nagusirik ez zeukan okerra zuzentzeko indarrik".
– "Inongo saltzailerik ez zion gusturik egiten".
– "Esaidazu zein ordua den".
– "Elkarri uzteko beharrean aurkitu ziren".
– "Hain azkar hurbildu zen, ezen ez zela haren presentziaz ohartu".
– "Eta bere izebarantz bihurtuz, galdetu zuen".

Nola liteke hainbeste akats larrik aurrera egitea, inolako kontrol gabe, hain eleberri ospetsu baten itzulpenean? Esaldi horiek honela behar zuketen:

– *Zuk baino hobeto (hobeki) dakit.*
– *Bai, noski.*
– *Gaizki zegoen (zegoelako) dudarik ez dago.*
– *Hiltzear zegoela guztiz konbentziturik.*

– *Ihes egiten zuen edozein tokitara.*

– *Inongo bezerok ezin zuen erosi, eta inongo nagusik ez zeukan okerra zuzentzeko indarrik.*

– *Inongo saltzailek ez zion gusturik egiten.*

– *Esaidazu zer ordu den.* ( '*Zein ordu da*' nagusituz doa, betiko 'zer ordu da' esamoldearen ordez).

– *Elkar utzi beharrean aurkitu ziren.*

– *Hain azkar hurbildu zen, ezen ez zen (ez baitzen) haren presentziaz ohartu.*

– *Eta bere izebarenganantz bihurturik, galdetu zuen.*

Horrelakoekin topo egitean, biziraun-senak liburua ixteko agintzen dit, eta atseginez obeditzen dut, idazle itzuliak sobra ere ulertuko duelakoan. Itzulpenetan ez ezik, euskarazko testu originaletan ere aurkitzen da, ez gutxitan, antzeko akats gehiegi. Saiatzen naiz jarraitzen, errespetuz edo konpentsazio literario baten itxaropenez, baina ez duda etengabeak eraso gabe, zertarako merezi duen norbere hizkuntzaren zauriengatik sufritzea, hainbeste irakurgai on eta zuzen egonik.





# LITERATURA ETA LIGHTERATURA

*Orain ezin naiz hil* eleberriari buruzko hiltzaldi baterako prestatu nuen testuaren zati batzuk hemen ematea interesgarri iruditu zait, eta horretara noa.

"Hitzaldi hau pentsa nezakeen –nioen orduan (2008)– saio entretenigarri bat bezala. Zerbait atsegina eta amenoa. Planteatuko ditudan gaiak, ordea, hizkuntari dagozkionak batez ere, hain garrantzitsuak izanik, uste dut eurok izan behar luketela askoz interesgarriago. Orain arte, honelako okasio gutxi gertatu zait. Gutxiegi, zoritxarrez. Ustez gauza inportanteak eduki esateko, eta nork entzunik ez. Moztasun kulturala. Edo inkontzientzia. Horregatik, asko eskertzen dut eman didazuen aukera. Eta entzuleria eta kolektibo kualifikatua zaretenez gero, ez nuke gutxiago eskertuko, baldin gaur entzungo dituzuen kontuak interesgarri iruditzen bazaizkizue, beste toki edo gune batzuetan ere azaltzeko bidea irekiko bazenidate.

*Joan ziren* izeneko zikloko bigarren liburukia da *Orain ezin naiz hil.*

Ziklo osoak nire bizialdi osoa hartzea da asmoa. Zelai amaigabea handi-handika banatzeko, eta kontaketa ordena orokor baten barruan eramateko, lehen biak haurtzaro-gaztaroan kokatzen dira, gehienbat. Amaitua baina errepasatzea falta zaidan hirugarrenaren zelaia 1960ko hamarkada esplosiboan garatuko da. Denetan ere, abiapuntua neure bizialdia da, eta garapena honela doa: Neure ingurua → Euskal Herria → mundua → unibertsoa.

Nire helburua bikoitza da: literatura + neure herria. Alderantziz nahiago duenarentzat, neure herria, literatura bihurtua. Literatura abiapuntu askotatik egin daiteke, noski. Nik neure zoruari guztiz atxikitako eredua nahi dut, miresten ditudan izen handi askok bezala. Batzuk aipatzeko horra, adibidez: Homero, Virgilio, Cervantes, Tolstoi, Joyce, Proust, Márquez, Aresti. Homero erabat grekoa da. Virgilio, erabat erromatarra. Cervantes, guztiz La Mancha. Tolstoi, Errusia. Joyce, Dublin. Proust, Paris. Márquez, Kolonbia. Aresti, erabat bilbotar, erabat Euskal Herriko. Horrela bilakatu dira unibertsal. Nire aldetik, gero bertatik nahi beste bidaia egingo badut ere, basea neure lurra da, neure ingurua, neure izenak, neure bizitza. Lur arrotzak, izen arrotzak ez zaizkit interesatzen. Bai interesatzen zaizkit, nola ez, autore arrotzak, baina ez arrotz itxuraz janzten diren, edo jantzi nahi duten euskal idazleak.

'Neure bizialdia' esan dut, baina ez kronika gisan. Bizi izan dudana, oroitzen dudana, motibo gisan interesatzen zait. Konposizio artistiko orok behar duen motibo gisan. Batzuetan, motiboak errealak dira, beste askotan, asmatuak. 'Motiboa' diodanean, zer esan nahi dudan adierazteko, hona, esaterako, bat, eta ez dakit bera garatua dudan. *165 ur*. Gabon oporretatik bueltan, seminariora eraman nuen egun adina urren istorioa, egun bakoitzean bat jateko asmoz. Hain astiro gutxituz zihoan piloa, egunak alegia, non hamabosgarrenean, desesperaturik, ur guztiak batera jan nituen. Motibo hori egiazkoa izanik, gero garapena guztiz asmatua izan daiteke. Niri garapena interesatzen zait, ez hainbeste, motiboa bera. Liburu honetan, motibo egiazkoak zein asmatuak izan, oroimena eta gertaerak, batera dabiltza. Oroimenean, berriz, atzera-aurrera posible guztiak.

Gertaeren bilakera bera adina interesatzen zaizkit kontzeptuen eta ideien erlazioak, dependentziak. Hortik, batzuetan, hizkuntzaren





konplexutasuna, ez irakurlea izorratzeko, erlazioak, dependentziak hizkuntzaren beraren baliabideekin adierazteko baizik. Landare bat, animalia bat, despieza daiteke. Zati-zati eginda, erraz-erraz asimila daiteke. Baina niri, sarritan, zatiak barik, osotasuna interesatzen zait, bere erlazio biziekin, batuekin. Hizkuntzak dependentziazko erlazioak menpeko perpausekin adierazten ditu. Horrexegatik dira 'menpekoak'. Horren adibide bat azkenean aurkeztuko dizuet.

Afirmazio hutsa –indikatiboa– baliabide literario ahula eta, sarritan, gratuitoa da. Batez ere, kontzeptuak eta ideiak adierazten direnean. Ideien adierazpen planoa –bi dimentsiotako marrazkia– pobrea izan daiteke. Zeharkako adierazpena da artistikoa, elegantea, onargarria. Erlazioei erliebea eman behar zaie, baieztapen gratuitoak izango ez badira. Horretarako dira menpeko perpausak.

Pentsaketa bera ere har daiteke gertaeren segida bat bezala. Gertaera pentsatuak edo pentsamenaren bilakaera, ibilera. Ibilera hori logikoa, inkoherentea, fantastikoa, arrazionala, irrazionala... zernahi izan daiteke. Adibidez, irudika ezazu ume bat, kalean bakarrik. 1) Bere ibilera konta dezakezu. Zer egiten du? Nora doa? Gertaera fisikoak. 2) Baina bere pentsaketa ere konta dezakezu. Pentsamenaren ibilera ere gertaera da, errealitate amaigabea. Beharbada, haurtzaroa erdi bakarrik igaro nuelako –beti pentsaketan–, pentsamenari jarraitzea dibertsiorik handienetako gisan sentitzen dut. Ez da hainbeste eleberi psikologikoa esaten dena, baizik edonoren buruan gara daitekeena, pentsamenari korritzen utziz. Hori artistikoki eta espresiboki egitea lortuz gero, errealitate objektiboa gaindi dezake. Adimendunak ez al gara?

Aipatu helburu guztiak lortzen saiatzeko, ahalik erregistro eta tonu ezberdinik gehien konbinatzea gustatuko litzaidake. Esaldi luze, ertain, labur, denerik. Eta sentiera mota ezberdinak ere, ahalik gehienak, ahalik konbinatuen: kontundentzia, samurtasuna, ironia, lirismoa, korrosioa, dialektika, sarkasmoa, xalotasuna, zinismoa...

Elkarrizketak. Hauen garrantzia ez dago deskubritu beharrik, baina badut, euroi buruz, zerbait propioa intentatzeko grina. Liburu honetan bada ordenagailuko 41 orrialde diren eta liburu formatuan 70 bat liratekeen

kondaira luze bat, non ia narrazio guztia elkarrizketa hutsean garatzen den, kontaketa hainbeste astuntzen duten makulu esplikatibo etengabeak saihestuz, hala nola: *esan zuen, galdetu zuen, erantzun zion, gaineratu zuen, berriz ere jaulki zuen, pentsatu zuen berekiko, ohartarazi zuen...* eta horrelakoak. Antzerkia bailitzan, baina behar diren azalpen eta kokapen eszenikoak ere elkarrizketa bihurtuz. Liburuki honetan probatua eta, ustez, lortua dudana prozedura ohikoago bihurtu da amaitua dudala esan dudan hirugarrenean.

Azkenik, euskalkiaren erabilera. Barne bakarrizketak, eta elkarrizketak bizkaieraz egiten ditut. Bariazio interesgarria iruditzen zait. Baina bizkaiera jasoa! Ez aspaldion zabaldu den euskalkien trataera tribalen eta exotikoen izurri hori.

Adierazi ditudan desio literario eta espresibo guztiak lortzeko, euskara potentea eta konpletoa nahi dut. Literatura nahi dut, ez *lighteratura*. Ez dut idazten jendea entretenitzeko. Horretarako badira mila aukera. Nahi dut, noski, irakurlea atxiki, hunkiarazi, astindu, burulana jarri, gozamena eman. Baina ez denborapasan. Ez entretenigarri gisan. Bada sarritan aipatzen den euskara 'erraz' bat. Badakit ondo ere idazkera errazean genialitateak sor daitezkeela. Genero batzuetan, haur-literaturan, adibidez, hizkuntzak araberako sintaxia eta erregistroak behar ditu. Egunkariko zutabe bat ere idatz liteke, beste adibide bat jartzearren, oso sintaxi sinplean, kasik kolokialean. Baina gauza bat da haur-literatura, eta beste bat, idazkera infantila, buru helduentzako irakurgaiak zortzi urteko haurren sinpletasun sintaktikoan aurkezten dituena. Sarritan, gainera, oso kontzeptu jasoak eta abstraktuak garatuz, eta egitura narratibo ustez konplexuak bilatuz. Orduan, helburu intelektualen eta idazkera infantilaren arteko diskordantzia nabariago gelditzen da. Aspaldiko euskal literaturan, lightasun horren adibideak ez dira gutxi ugaldu. Irakurleen mailagatik-edo, arrakasta komertziala lortzeko balio badu ere, niri ez zait lighteraturarik interesatzen.

Nire helburua ez da, noski, konplexutasun bortxatura jotzea, baizik aurkezten zaizkidan ahalbide espresiboak ez murriztea, hizkuntzaren mugengatik. Euskarak interbentzio orokorra behar du. Ahalik sailkatuena eta espezifikoena, baina, aldi berean, guztiz unitarioa eta antolatua.





Aberastasun dispertsoa pobrezia da, tribalismoa. Soluzioak ematen saiatzen naiz, eta erabaki dut inoren zain ez egotea. Lexikoan, jargoian eta argotean batez ere, badakit ez dagoela bat-bateko osotasunik lortzerik, artifizialki ez bada. Egitura sintaktikoetan, ostera, ez dut ezertan atzera egin nahi. Euskarak badituenak osoki baliatu nahi ditut, behar direla iruditzen zaidanean, ustezko 'erraztasunera' makurtu gabe. Eta ez dituenei soluzioak aurkitzen dizkiet, albo-bideak, itzulinguruak edo mozketak baztertuz.

Badut aspaldi idatzitako saiakera luze bat, ordenagailuaren loan datzana, non liburu hauetan praktikatzen ditudan kriterioak azaltzen diren. Laburpen doi-doi bat egingo dizuet. Askoren arteko zenbait auziren aipamen soil bat".

Hortik aurrera, saiakera honetan azaldu diren zenbait atal laburtzen nituen.

# ADIBIDE BAT KONPLEXUTASUNEAN

Azkenean, adibide literario posible gisan, honako pasartea ematen nuen:

*"Lautada biluz bat, soila berez, edo zur-industriak soildua. Ezustean, zuhaitz bat agertu zait. Hurreratzean, ez dut aurkitzen hostozko elipse tente bat besterik, zeinaren funts bakarra zurtoinak eta adarrak enkubritzea den, hauek, enborrera koneksioaren bitartez, sustrai lanpetuen izerdia esplota dezaten, osotasunaren zentzu nagusia ez balitz bezala txorien habiagune edo tximinoen jolasleku izatea, zeragaz lortzen den, behingoz, zuhaitz bakartiak ostentatzea, kasu batean, izate sortzailea eta, bestean, funtzio soziala, ahaztu gabe, nola ez, bere azpian biago eulitsua jasatera bildua izan zitekeen lehoi-talde errenditua, astebeteko amorrua zebra ipur-borobil baten txikizioz ematu ondoren, euron sendikide bat gizakiak hiltzetik atsedentzera etorritako ehiztari aristokratikoen rifleetan jaustetik laster, hain zuzen, bizia ez baita hilen memoriatik elikatzen".*

Paragrafo honek esageratuki konplikatua eman lezake, baina ez da inondik ere irreala. Estiloak alde batera utzita, edozein idazle handirengan

aurkituko dituzu hainbesteko edo areagoko konplexutasunak. Pasarte bera honela ere idatz zitekeela ematen nuen hurrengo adibidean:

*"Lautada biluz bat, soila berez, edo zur-industriak soildua. Ezustean, zuhaitz bat agertu zait. Hurreratzean, ez dut aurkitzen hostozko elipse tente bat besterik. Beronen funts bakarra zurtoinak eta adarrak enkubritzea da. Hauek enborrera konektaturik daude. Sustrai lanpetuen izerdia esplotatu nahi dute. Osotasun guztiaren zentzu nagusia, ordea, txorien habiagune edo tximinoen jolasleku izatea da. Zuhaitz bakartiak lortu du, behingoz, helburu bikoitza: kasu batean, izate sortzailea, bestean, funtzio soziala. Ahaztu gabe, nola ez, bere azpira bildua izan zitekeen lehoi talde errendituа, euren biago eulitsua jasatera. Astebeteko amorrua ematua dute, behintzat, zebra ipur-borobil baten txikizioz. Euron sendikide bat, ostera, rifleen menpean jausi berri da. Rifleak ehiztari aristokratiko batzuenak ziren. Gizakiak hiltzetik atsedentzera etorriak ziren, hain zuzen. Lehoiek orain lo egin behar dute, bizia ez baita elikatzen hilen memoriatik".*

Pasarte honek ere, beharbada, esageratuki zatitua eman lezake, baina arestian aipatu lighteratura ez dabil bertotik urrun, pentsaturik irakurle ahulari janari 'erraza' eman behar zaiola. Edo uste duelako, areago, estilo literario hobea dela. Estilo-gustuei buruzko eztabaida ebatzezinetik harago, argi dago lehen pasarteak eta bigarrenak antzik ere ez dutela ez egituran, ez kolorean, ez espresibitatean. Bigarrenak harategian eskaintzen den animalia zatikatua dirudi. Ez dago gaizki, noski, baina nik animalia osorik eta bizirik nahi nuen. Orain, egin dezagun lehen pasartearen itzulpen bat gaztelaniara.

*"Una desnuda llanura, pelada ella, o arrasada por la industria maderera. Inesperadamente, un árbol aparece ante mí. Al acercarme, no encuentro más que una elipse de hojas erguida, cuya única razón es encubrir los tallos y las ramas, para que éstos, mediante su conexión al tronco, exploten el sudor de las trabajosas raíces, como si el sentido principal del conjunto no consistiera en ser un nidadero de los pájaros o un divertidero de los monos, con lo que se logra, por fin, que el árbol solitario ostente, en un caso, una esencia creadora, y en el otro, una función social, sin olvidar, cómo no, la rendida manada de leones que, tras haber calmado su rabia con el despedazamiento de una cebra de culo redondo, poco despues de que los rifles de unos cazadores aristocráticos, venidos a descansar de una matanza de humanos, hubieran abatido a un miembro de su familia, hubiera podido recogerse bajo dicho árbol a soportar una siesta apestada de moscas, porque la vida no se alimenta de la memoria de los muertos".*





('Nidadero' eta 'divertidero' hitzak ez dut uste gaztelaniaz existitzen direnik).

Euskaraz, oso esaldi konplikatua iruditu zaionak gaztelaniazkoa nahiko 'erraz' jan du. Baliteke estiloa ez gustatzea, baina ulermenean ez dauka problemarik. Erdaraz, ohituta dago horrelakoak irakurtzen. Eta batez ere, erdarazko sintaxia oso era naturalean menperatzen du.

Euskaraz, pentsatu egin behar du, *'zeinaren funts bakarra...'* perpaus erlatiboa erdarazko 'cuyo'-rekin asoziatzeko. Pentsatu egin behar du, *'enborrera koneksioaren bitartez'* horretako hitzen lotura erdarazko 'conexión al tronco'-rekin asoziatzeko. Pentsatu egin behar du, batez ere, *'zeragaz lortzen den'* erlatibo hori erdarazko 'con lo que se logra'-rekin asoziatzeko. Pentsatu egin behar du, euskarazko *'bildua izan zitekeen'* aditz-denbora gehi erlatiboa erdarazko 'que hubiera podido recogerse' horrekin asoziatzeko. Pensatu egin behar du, *'euron sendikide bat'* erdarazko 'un miembro de su familia'-rekin asoziatzeko. Pentsatu egin behar du, *'amorrua... txikizioz ematu'* espresioko kontzeptuak lotzeko, erdarazko 'calmar su rabia con el despedazamiento' delakoan bezala. Pentsatu egin behar du, *'hauek (...) sustrai lanpetuen izerdia esplota dezaten'* hain eroso ulertzeko, nola erdarazko 'para que éstos (...) exploten el sudor de las trabajosas raíces". Pentsatu egin behar du, hitz batez, zati berez ez hain 'erraz' guztion kateamendua erdarazko itzulpenean bezain jarraigarri egin dakion.

Gauza asko pentsatu behar ditu euskarazko irakurle batek, erdaraz hain natural egiten zaion testu bat ulertzeko. Hortxe dago koska nagusia, sarritan esplikazio iheskorrekin enkubritzen saiatzen garena. Lan honetan zehar, behin baino gehiagotan aldarrikatu dudan ideiarekin amaitzeko, euskara potentea eta konpletoa nahi dut, gure inguruko hizkuntzetan hain barneraturik dauden konplexutasunen aurrean atzera egingo ez duena.